Gomendatutako katalogo fitxa / Ficha catalográfica recomendada



ZIZURKILGO

Zizurkilgo Baserriak / Zuzendaritza : Alfredo Moraza Barea ; Arkitekturaren dokumentazio lanak : Miren García Dalmau, Javier Buces Cabello, Maider Carrere Souto ; Agiritegietan dokumentazio lanak : Juan Carlos Mora Afan, Alfredo Moraza Barea. – Tolosa : Lizardi Kultur Elkartea, 2010.

476 or. : ir.kol. – (Tolosaldea historia bilduma, ISSN 1579-6299 ; 15)
L.G. SS 1608-2010. – ISBN 978-84-935707-3-6

I. Moraza Barea, Alfredo (Zuz.) II. Garcia Dalmau, Miren III. Buces Cabello, Javier IV. Carrere Souto, Maider V. Mora Afan, Juan Carlos 1. Baserriak – Zizurkil 2. Zizurkil – Historia

C.D.U. 728.6(460.154 Zizurkil)
946.015.4 Zizurkil





Argazkiak: Bestelako aipamenik ez badago argazkien egilea Aranzadi Zientzia Elkartea da.



**Tolosaldea Historia Bilduma 15**
Zuzendaria: Juantxo Agirre-Mauleon

Maketazioa: Tamtam S.L.
Inprimatzen du: Gráficas Lizarra
BAKUN enpresak euskaratua

ISSN: 1579-6299
ISBN: 978-84-935707-3-6
Lege gordailua: SS-1608-2010



**Eskerrak:** Patxi Otegi
Julian Arrastoa
Bartolome Auzmendi
Zizurkilgo Udala
Joxin Azkue
Gipuzkoako Foru Aldundia
Gipuzkoako Agiritegi Orokorra
Donostiako Udal Agiritegia
Archivo de la Real Chancillería de Valladolid
Kutxa Fototeka
Zizurkilgo baserritarrak
Alberto Irazu
Eli Jauregi



Zuzendu gutunak helbide honetara:
Diríjase toda la correspondencia a:

**ARANZADI zientzia elkartea**

Zorroagagaina 11
20014 Donostia - San Sebastián
Tel.: 943466142 Fax: 943455811
e-mail: idazkaritza@aranzadi-zientziak.org
www.aranzadi-zientziak.org



"ZIZURKILGO BASERRIAK" du izenburu zureganaino iritsi den liburu honek. Aurretik argitaratuak ditugu 1186-1950 urte bitartean gure herriak izan duen bilakaeraren berri eman dizkiguten hiru monografia. Aurreko lanak bezalaxe Aranzadi Zientzia Elkartearekin elkarlanean egindakoa da Zizurkilgo historiari buruzko bildumari amaiera emango dion azken hau ere.

Gure herriaren iragana ezagutzeak berealdiko garantzia zuela ohartuta hartu genuen historia liburuak argitaratzeko erabakia. Datozen belaunaldiei, garai bateko historia, usadio, bizimodu eta herriaren nortasun ezaugarrien berri emateaz gain, etorkizunean ere lagungarri gerta dakigukeena ezagutzea ere bazen gure helburua.

Iraganaren ezagutza horretan baserriak funtsezkoak izan dira, gure herriaren nortasun ezaugarri nagusienak dira eta horrexegatik eskaini diegu liburu oso bat.

Liburuak batetik, sarrera txiki bat du, ondorengo azalpenak hobeto ulertzen laguntzen duena eta bestetik, baserrien fitxak ditu. Fitxa horietan baserri bakoitzaren zenbait aipamen eta azalpen azaltzen dira, hala nola, izena, kokapena, arkitektura ezaugarriak, historia, jabeak, argazkiak…

Ez dut zalantzarik borondate onenarekin egin den lan baten aurrean gaudela, ahalik eta txukunen egiten saiatu gara denok baina hemendik doakizue nire barkamena hutsegiteren bat egin badugu.

Gure helburua lortzeko herritarren laguntza behar genuen. Eta laguntza handia izan da eskaini diguzuena: gure eskerrik zintzoena zuen etxeetako ateak ireki eta informazioa biltzen lagundu diguzuen orori. Eskerrak eman era berean, laguntza eskaini diguten instituzioei ere.

Hemen amaitu da 2005ean hasitako ibilbidea; herritarrok eta ingurukook herriari buruz genuen ezagutza handitzeko eta sakontzeko balio izan badu lortu dugu gure helburua.

Goza dezazuela!

**Mª Ángeles Lazkano**
**Zizurkilgo alkatesa**

## AURKIBIDEA

or.

## A.- SARRERA

Azken urteotan hainbat monografia argitaratu dira, Zizurkilen historia ezezagunaren alderdi nagusiak ezagutarazteko. Bilduma hori Zizurkilgo baserriei buruzko liburu honekin bukatuko da. Izan ere, Tolosaldeko herri honen ibilbide historiko luzean, baserritarrak izan dira protagonista nagusiak.

Ikerketak funtsezko helburu hau izan du: Zizurkildarrei eta inguruko herrietako biztanleei errealitate bat, sarritan ezezaguna, erakustea.

Aranzadi Zientzia Elkarteko ikertzaile-talde batek egin du lana. Askotariko taldea izanik, ikertzaile horiek hainbat ikuspegitatik lan egin dute azken emaitza hau lortzeko. Baserri guztiak bisitatu dituzte eta haien jabeekin elkarrizketak egin dituzte, eraikinei buruzko datu historikoak eskatzeko. Ondoren, datu horiek zenbait artxibo arakatuta (Zizurkilgo Udal Artxiboa, Gipuzkoako Artxibo Orokorra, Gipuzkoako Protokoloen Artxibo Historikoa, Donostiako Elizbarrutiko Artxibo Historikoa, Tolosako Jabetza Erregistroa…) ateratakoekin alderatu dituzte.

Liburuak baserrien historiari, eboluzioari eta arkitekturari buruzko sarrera txikia jasotzen du hasieran. Irakurleari ondorengo testua hobeto ulertzeko aurretiko tresna eskaintzea da horren helburua. Horretarako, zenbait irudi eta eranskin grafiko gehitu dira, gero testuan erabiliko diren termino batzuk ulertzen laguntzeko, hasieran termino horiek ulertzeko zail samarrak izan baitaitezke, haien teknizismoa dela eta.

Liburuaren gorputza Zizurkilgo baserrien zerrendak osatzen du. Baserri horiek, 120 guztira, ordena alfabetikoan zerrendatuta daude, fitxa banatan. Fitxa bakoitzak dagokion baserriaren etimologia jasotzen du hasieran, baita izenak denboran zehar izan dituen aldaketak ere; ondoren, baserriaren kokapenaren deskribapen laburra egiten du. Arkitekturaren atalean, eraikin bakoitzaren deskribapen laburra eta egungo eraikuntza-ezaugarriak jasotzen dira, egungo baserria noiz eraiki zen azpimarratuta. Ondoren, baserri bakoitzari buruz eskura ditugun datu historikoak edo baserriaren eboluzioaren bestelako alderdi esanguratsuak ematen ditu. Azkenik, eranskin txiki batean, baserri bakoitzak dokumentuen arabera izan dituen jabeen zerrenda ageri da. Testua osatzeko, eraikin bakoitzaren argazkiak ere jasotzen ditu liburuak, bai historikoak, bai berriak; eta familia-argazkiak daudenean, horiek ere erantsi dira argazki sortan.

Agerikoa da baserri batetik bestera alde handia dagoela liburuan eskainitako espazioan; baserri bakoitzari buruz eskura dagoen informazio handiagoa edo txikiagoa da horren arrazoia.

Liburuaren bukaeran, XX. mendearen lehen erdialdean batez ere eraikitako hainbat hiri-etxeren zerrenda jasotzen duen eranskin txikia dago. Etxe horiek izandako berezitasuna dela eta, komenigarritzat jo dugu liburuan sartzea, nahiz eta eman zaien tratamendua askoz arinagoa izan.



**Zizurkilgo ikuspegi orokorra.**

## Esker onak

Esker onen atalean, lehenik eta behin, baserri-jabe guztiek uneoro eskainitako laguntza eskertu beharrean gaude, liburua idazteko beharrezko datuak emateagatik eta, batez ere, haien etxean sartzen konplexurik gabe uzteagatik. Haiek gabe, esfortzua alferrik izango zen.

Bigarrenik, ezin dugu ahaztu Udalak eta bere teknikariek liburu hau aurrera ateratzeko bete duten funtsezko zeregina. Eskerrak eman behar dizkiogu Maria Angeles Lazkano alkateari, baita proiektu hau gauzatzeko azken ardura izan duten Ainhoa Larrea Kultura teknikaria eta Ainhoa Azpeitia Nekazaritza teknikariari ere.

Eta ezin ditugu ahaztu udalerrian kokatutako hainbat enpresak Zizurkilekin betidanik izan duten laguntza eta konpromisoa.

## B.- LEHEN BASERRIAK

*"Udaren erdialdeko egun batean, "San Martintxiki" izeneko heroi ausartak eskukada bat gari-hazi lapurtu omen zien mendiko jaunei, basajaun erraldoiei. Ondoren, hizketan ari zirela, zer esaten zuten entzuteko zelatan egon zen, eta horrela jakin zuen urteko zer sasoitan erein behar ziren haziak".*

Jose Miguel Barandiaranek gaztetan Ataunen entzundako elezaharra da hori. Euskaldunek nekazaritzaren sekretuak ezagutzeko bizi izandako abenturak kontatzen ditu, ordura arte basoko izaki eta jainkoek soilik ezagutzen baitzituzten sekretuok. Sekretuen jabe izanda nekazari bihurtu ziren, eta horrela sortu omen ziren lehen baserriak. Eraikin horiek, gerora, haien lanaren funtsezko elementuak eta haien kultura-nortasunaren adierazpen nagusia izango ziren.



GFA.OA. 6754

**Baserritarra bere idi-parearekin, Zarateko Bentaren ondoan (1930).**



GFA.JDIR 2-7-105

**Zizurkilgo eta inguruko planoa 1781 aldera.**

Lehen euskal baserri haiek, gaur egun ezagutzen ditugun bezala, hau da, nekazaritzarako etxeak, duela bostehun urte inguru sortu zirela dirudi. Aurreneko baserri haien berezitasuna hau zen: guztiek izen propioa zuten. Izen hori ezaguna eta aldaezina izango zen urteetan zehar. Baina ezin dugu ahaztu baserriek, denboraren poderioz, aldaketak izan dituztela. Horregatik, ezin ditugu nahastu izenaren antzinatasuna eta baserriarena, eraikinak hainbat aldiz berreraiki dituztelako.

**ZIZURKILGO JATORRIZKO 21 OINETXEEN ZERRENDA (1625)**
San Millian Done Maria Ahaide Nagusiena; Andia; Andiazaval; Andrechqueta; Araeta; Araeta Bitartecoa; Arizmendi; Azcarate; Irazu Garaicoa; Irazu Azpicoa; Iturralde; Larrondobuño; Legarralde; Loidi; Luzuriaga; Otazu; Fagabuno; Verastegui; Yarza; Zaldua Garaicoa; Zaldua Azpicoa.

## B.1.- Baserrien sorrera

Erdi Aroko baserritarren aurreneko etxebizitzak zurezko etxolak ziren, oso eraikuntza errazekoak: barruko egitura zutoinez osatua zen eta hormak oholez eginak ziren. Animalientzako espazioa, lastoa gordetzekoa eta familia bizitzekoa partekatua zen.

Harrizko lehen baserriak XV. mendearen bukaeran eraikitzen hasi ziren. Familiarik boteretsuenek soilik eraiki zitzaketen horrelako etxeak, eraikuntzak inbertsio handia eskatzen baitzuen. Kalitate handiko



**Legargain baserria, abereentzako antzinako borda baten gainean eraikia.**



**Sagardo-dolarea Igartubeiti baserrian (Ezkio-Itsaso).**



**Sagardo-dolare berrerazketa.**

eraikinak ziren eta, bereziki, familia eraikitzailearen boterea jendaurrean erakusteko helburua zuten. Zura, berriz, doan atera zitekeen baso publikoetan, eta errazagoa eta merkeagoa zen lantzeko.

XVI. mendearen lehen erdialdean, aberasteko aukera berriak sortu ziren eta, horri esker, baserritarrak lasaiago bizi zitezkeen (karrera militarra edo burokratikoa Gortean, Amerika edo Europa). Garai hartantxe hasi ziren harrizko eta zurezko baserriak eraikitzen, teknika mistoak erabiliz. Hargintzako eta zurgintzako lanen kalitatea ikaragarri ona zen. Barruko espazioak ondo

zehaztuta eta sailkatuta zeuden, bete beharreko zereginetarako. Normalean bi solairu izaten ziren: behekoa familiarentzat eta animalientzat, eta goikoa uzta gordetzeko.

XVI. mendean, baserritarrek biltzen zituzten produktu nagusiak sagarra eta garia ziren. Hori dela eta, baserri askotan sagardoa egiteko zurezko dolare handiak eduki ohi zituzten. Sagardoa upeletan gorde ohi zuten eta, askotan, lurraren desnibela aprobetxatuz eraikitako sotoetan. Bildutako garia ere soto horietan gordetzen zuten, bihitegi izeneko zurezko arkoi handietan.

XVI. mendearen bukaeran, Gipuzkoako ekonomia krisialdi larrian murgildu zen. Alde batetik, Gaztelako gariaren eta artilearen nazioarteko merkataritzak kolapsoa eragin zuen portuetan; bestetik, Ternuko arrantza-lekuen blokeoak ontzigintzaren gainbehera ekarri zuen. Horrez gain, Itsas Armada Garaiezinaren porrotak, 1587an, ontzi eta marinel gipuzkoar asko desagerrarazi zituen, eta 1598an, izurritea zabaldu zen. Arazo horien guztien ondorioz, gizartea landatartu egin zen, aberatsek zein pobreek baserrian ikusi baitzuten egoeraren irtenbidea. Dirudunek beren kapitala inbertitzeko, baserriak erosiz eta gero alokatuz, eta pobreek baserrian bizibidea aurkitzeko. Hala ere, ohiko laboreak ez ziren nahikoa, eta lurrak saturatuta zeuden. Orduan, arazo horri irtenbidea eman zion landare amerikarra agertu zen: artoa. Landare hori erraz girotzen zen hemengo klimara, uztek ale asko ematen zituzten eta Euskal Herriko lur heze eta aldapatsuetarako landare egokia zen.

Baserri-jabe handientzat, bazter-lurrei etekina ateratzeko aukera ekarri zuen artoak. Horretarako baserri berriak eraiki zituzten abereentzako borda zaharren gainean edo, besterik gabe, oin berrikoak, ondoren maizterrei alokatzeko. Ziklo hori XVIII. mendearen erdialderaino luzatu zen. Bitarte horretan, familiarik boteretsuenek gero eta baserri gehiago eskuratu zituzten, bai zailtasun ekonomikoak zituzten beste jabe batzuei erosita, bai ezkontzen bidez. Politika horren adierazpenik argiena maiorazkoen sorrera izan zen. Arbasoen oroimena ondratzeko aitzakian, haien benetako helburua onibarren osotasuna bermatzea zen, maiorazko horiei gehitutako onibarra saltzea ezinezkoa baitzen.

Aldi berean, baserri-jabe aberats haiek ohartu ziren etekin handiagoa atera zezaketela baserri bakoitza familia batzuei alokatuta. Hala, baserriak bi edo hiru lotetan banatu ohi zituzten.

Ordaindu beharreko errenta, hasiera batean, eskudirutan ordaintzen zuten maizterrek edo, bestela, Gabonetan animaliaren bat ematen zieten jabeei (kapoiak izaten ziren). Baina, denborak aurrera egin ahala, usadio hori aldatu egin zen, eta maizterrak baserriaren errenta espezietan ordaintzera behartu zituzten, gehienetan gari edo arto anegatan. Edo, bestela, urtero karobi bat egin beharko zuten lurrak ongarriztatzeko, zuhaitzak landatu... Horrela, baserritarrek bi labore erein behar izaten zituzten aldi berean: artoa beren familiarentzat, eta garia errentak eta elizarentzako zergak (hamarrenak) ordaintzeko.

**ZIZURKILEN SORTUTAKO MAIORAZKOAK**

| Izena | Sorrera-urtea | Gehitutako baserriak |
|---|---|---|
| Ihartza | 1690 | Ihartza, Beldarrain |
| Iraola | 1701 | Iraola |
| Larrondobuno | 1711 | Larrondobuño, Altziturri, Odolkierraga |
| Iragorri | 1717 | Iragorri, Arandabarro, Abeletxe |
| Fraisoro | 1715 | Fraisoro, Sagasti |
| Irazuazpikoa | 1724 | Irazuazpikoa, Irizibar, Mendigain, Lizardi |
| Aretazpikoa | 1733 | Aretazpikoa, Legargain |
| Agirre | 1740 | Agirre |
| Bengoetxea | 1740 | Bengoetxea, Malkorra |
| Nekola | 1749 | Nekola, Sarobe, Zalduzar |
| Landare | 1752 | Landare |
| Irazugoikoa | 1755 | Irazuazpikoa, Zearsoro, Iturralde |
| Azkarate | 1764 | Azkarate |
| Andrezketa | 1769 | Andrezketa |
| Luzuriaga | 1776 | Luzuriaga, Errekalde, Amabi |
| Berastegi | 1780 baino lehen | Berastegi, Burrustidi |
| Legarralde | 1780 | Legarralde, Susperro |
| Salugarate | 1785 | Salugarate |
| Apaizetxea | ?? | Apaizetxea |

## B:2.- Baserrien gainbehera

XVIII. mendean, bai gizonek bai emakumeek gogor lan egin ohi zuten beren laboreak aurrera ateratzeko. Produkzioa handia bazen ere, kostua ere halakoa zen, eta lurra agortu egiten zen. Hori konpontzeko, artisau-labeetan egositako kareharriz ongarriztatzen zituzten soroak. Hala ere, sistema horren gehiegizko erabileraren ondorioz, lurrik onenak aldi baterako kaltetu egiten ziren.


Joxin Azkue

**Ipidegiko karobia (2005).**

Arazo horren konponbidea XIX. mendearen hasieran iritsi zen, baserri berriak sortu eta haien inguruko lur guztiak labakitu egin baitziren. Gatazka belikoak etengabekoak ziren garai hartan (Konbentzio Gerra, Ingalaterraren aurkakoa, Independentzia Gerra…) tokiko ogasunek presio handia jasan behar izan zuten eta, ondorioz, hutsik geratu ziren. Udalak, kontribuzio horiek ordaintzeko edo diru kopuru handiak mailegatu zizkioten auzoekin hartutako zorrak kitatzeko, bere ondare higiezinaren zati handia saldu behar izan zuen (Akezkoako eta Alkanitzeko errotak, Atxulondo, Itzumitz, Susperro…) eta baita herri-lur asko ere. Lur horien gainean baserri berriak eraiki (Goikoetxea, Oiartzun, Olentzaroetxeberri...) eta luberriak zabaldu zituzten. Horrek emaitza onak ekarri zituen hasiera batean; izan ere, sasoi hartan, produktu berriak landatzen hasi ziren -hala nola babarrunak eta patatak-, arto-uztaren bolumena hirukoiztu egin zen eta gari-uztarena egonkor mantendu zen. Horren ordainez, garai hartan eraikitako baserriak txikiagoak ziren eta, itxuraz, pobreagoak.


Patxi Otegi

**Susperro baserria, Udalak 1810ean saldua.**

XIX. mendean zehar lurraldean eragina izan zuten gatazka belikoek oso ondorio txarrak izan zituzten. Hala, Independentzia Gerran baserri batzuek kalteak jasan zituzten. Baina ondoriorik okerrenak II. Karlistaldian iritsi ziren (1871-1875), gerrate hartan hainbat borrokaldi gertatu baitziren Zizurkilen. Horietako bat Belabietako Gudua (1873) izan zen; horren ondorioz, ia hogei baserri suntsitu edo oso kalte handiak jasan zituzten.

Industrializazioa heldu zenean, lurraren ustiapena goitik behera aldatu zen. Eskualdean kokatutako lantegietako lanak baserritarrak erakarri zituen, bizitza hobearen itxaropenean. Horrela, ekoizpen txikiko baserriak pixkanaka bertan behera geratu ziren. Gauzak horrela, jabeek, beren maila ekonomikoari eusteko, alokairuaren prezioa bere horretan utzi edo lurrak landatu gabe utzi behar izan zituzten. Azkenik, baserriak lehengo maizterrei saldu behar izan zizkieten, prezio egokian. Horrek beste aldaketa bat ekarri zuen laboreetan: garia, sagarra eta beste labore tradizional batzuk bazterrera utzi eta lurrak sega-belarditarako eta hazkunde azkarreko konifero-basotarako erabiltzen hasi ziren.


Bartolome Auzmendi

**Larrondobuno baserriaren inguruko belardiak**

XX. mendea iritsi zenean, baserri berriak eraikitzeaz utzi zuten eta, horren ordez, lehendik zeudenak zaharberritu zituzten eta erosotasun berriez hornitu. Hala ere, Gipuzkoako baserriak Europako kalitate handieneko landa-etxeak izatea ahalbidetu zuten elementurik bereizgarrienak galdu egin ziren horrela.

Denboran zehar, herrien barne-antolaketa zenbait irizpideri jarraiki egin izan da, eta horrela, auzoak, barrutiak, kuartelak eta abar daude. Zizurkilen kasuan, zehazki, banaketa hori egiteko figura jakin bat baliatu izan da: bailarak. Ez dakigu historiako zer unetan eratu ziren bailarak, baina galduz joan dira garai modernoekin batera. Ondoriozta daiteke haien jatorria komunitate-lana antolatzeko beste modu tradizional batzuetan egotea, beste herri batzuetan ikusi izan den bezala. Zizurkilen lau bailara daude: Elbarrena, Mendibailara, Akezko bailara eta, azkenik, Irazu bailara, Buztin bailara ere baderitzona.

- **Elbarrena bailarak** iparraldetik Mendibailararekin egiten du muga; ekialdean Villabona-Amasako lurrak ditu mugakide; eta hegoaldean eta mendebaldean Akezko bailara dago.



- **Mendibailarak** iparraldetik Aia, Usurbil eta Donostiako (Zubieta) lurrekin egiten du muga; ekialdetik, Andoaingo eta Adunako mugekin; hegoaldean Elbarrena bailara du mugakide; eta mendebaldean, Irazu bailara.
- **Akezko bailarak** iparraldetik Elbarrena bailararekin eta Irazu bailararekin egiten du muga; ekialdetik, Villabona-Amasako lurrekin; hegoaldean, berriz ere Villabona-Amasako lurrak ditu mugakide, bai eta Asteasukoak ere; eta mendebaldetik, Asteasuko lurrekin eta Irazu bailararekin egiten du muga.
- **Irazu bailarak** iparraldetik Aiako lurrekin egiten du muga; ekialdean Mendibailara du mugakide; hegoaldean, Akezko bailara; eta mendebaldean, Asteasuko eta Aiako lurrak.

## C.- BASERRIEN ARKITEKTURA

Atal honetan baserriaren beste ikuspegi bat jorratuko dugu: nekazaritzako eta abeltzaintzako jarduerak betetzeko eta familia bizitzeko espazio guztiak barne hartzen dituen espazio fisikoa. Zizurkilgo baserri bakoitza garaiaren arabera sailkatu dugu eta eraikin horiek mendeetan eta urteetan zehar izan dituzten aldaketak aintzat hartu ditugu. Ezin dugu ahaztu baserri horiek aldaketa sakonak jasan dituztela, dela materialak hondatu direlako, suteengatik, uholdeengatik… Ondorioz, estilo eta garai desberdinetako eraikuntza-elementuak dituzte nahasita.

Azken urteotan egindako ikerketei esker, gero eta datu gehiago ditugu baserri horien ezaugarri eta eboluzio formalari buruz. Eta ikerlan honek ere ekarpen erabakigarria izango du helburu horretan.

Pentsatzekoa da Zizurkilen, Erdi Aroan, zurezko txabola edo etxolak egon zirela. Izan ere, egungo baserri asko aipatzen dira zeharka, gutxienez, XIV. mendearen bukaeraz geroztik. Horregatik, gaur egungo abizen batzuk, esaterako Nekola, Irizibar, Legarralde, Zaldua, Erretenbarrutia edo Andia, haien jatorrizko etxeari zor zaizkio. Dena dela, eraikin haien xumetasuna dela eta, ez zaigu haien arrastorik heldu gure garairaino. Litekeena da lehenengo baserriak eta etxola haiek, gerora desagertuko zirenak, aldi berean egon izana XV. mendearen bukaeran eta XVI. mendearen hasieran. Era berean, baliteke jatorrizko baserri batzuen azpian etxola horien arrastorik aurkitzea.

### C.1.- Baserri errenazentistak

Zizurkilgo lehen baserriak XV. mendearen bukaeran eta XVI. mendearen hasieran eraiki ziren. Horregatik, eraikin horiek elementu gotikoak eta errenazentistak dituzte. Garai hartako eraikuntzan protagonista nagusia zura zen: inguruko hariztiei esker, zurezko egitura bikain eta iraunkorrak eraiki zitezkeen. Egitura horiek lurretik estalkira doazen pieza bakarreko zutoinak dituzte, pilare izenekoak. Zutoin horiek mihiztatutako besoak dituzte euskarri gisa, haietako batzuk ohiko “enara-buztan” motako kaxak dituztela. Zurgintza-teknika aurreratu hura Alemaniatik heldu zen eta zabal hedatu zen gure lurraldean.

Barruko espazioa sagardo-dolarearen inguruan egituratzen zen. Egitura handi horrek palanka, habeak eta zurezko torlojua zituen eta baserriaren erdialdean kokatzen zen. Horregatik, espa-



**Pilareharri handiak Errentenbarrendi baserriko ukuiluan eta,haiei eutsita, pilareak.**

zioaren aprobetxamendua nabarmen baldintzatzen zuen. Beheko solairuan ganadua egoten zen eta teilatupean uztak, batik bat garia. Horiek guztiek ez zuten leku handirik uzten familia eroso bizitzeko eta, gehienetan, biztanleek bigarren mailako espazioa okupatzen zuten.

Zizurkilen badira oraindik horrelako dolare-baserri batzuk. Zutoinen egituraren zati bat eta zurezko habeak gorde dituzte, baina bat ere ez da osorik kontserbatu. Horien artean, azpimarratzekoak dira Aundia, Berastegi, Iragorri, Legarralde edo Zalduazpikoa baserrietan kontserbatu diren arrastoak.

Baserri horien kanpoko irudia ezberdina da baserri motaren arabera (harrizko baserriak, bilbaduradunak, erdiko karrerapedunak, harrortzak dituztenak, sotodunak…). Baserri mota horiek XVI. mendearen bukaeratik XVII. mendearen hasierara bitartean nagusitu ziren:

- Harrizko baserriak oso hermetikoak dira, argi gutxi iragaten uzten dute eta itxura sendoa dute. Sarreran harlanduzko arkua dute, baita, kasu batzuetan, ojiba-baoak, konopialak edo erdi-puntukoak ere. Gehienetan, bao-buruak monolitikoak dira eta arku forma dute. Horrelako baserriak dira Apaizetxea, Aundia, Irazugoikoa, Irizibar eta, guztietan berezkoena, San Millan etxea, bere bao bikoitz konopial txikiekin. Hala ere, etxe horrek antz handiagoa du jauregiekin nekazaritzako etxeekin baino.


**Aundia baserriko antzinako dolare-habeak.**


**“Enara-buztan” motako mihiztadura Berastegi baserrian.**


**Irazugoikoa baserriko bao zorrotza.**


Sanmillan baserriko arku konopialeko leihoa.

- Bilbaduradun baserriak eraikitzeak kostu txikiagoa du. Bilbadura zurezko zutoin eta zubi batzuek osatua da eta, horien arteko hutsunea, harri-hormazko, oholezko edo adreiluzko paramentuz betetzen da. Egitura hori guztiz bideragarria da baserriko fatxadetan. Hutsuneetan argitzeko baoak irekitzen dira, sarritan arku edo bestelako apaingarriak irudikatzeko zizelkatuak. Bilbaduradun baserri horietako batzuk dira Adunibar, Ihartza, Iragorri, Errentenbarrendi, Plazaetxeberri edo Salugarate. Horietatik lehenengo lauek, gaur egun, bilbadura ezkutatua dute kareztaduraren azpian eta, horregatik, ez dago begi-bistan.
- Hirugarren baserri mota erdiko karrerapedunek osatua da. Karrerapeak alboetan harrizko zutoinak eta zabalera osoan habe frontal lodia ditu.
- Beste eredu bat alboko harrortzak dituzten baserriena da. Horietan, aurreko fatxadak alboetan aurrerantz luzatzen diren hormak ditu, eskegitako pilastrak balira bezala. Horiek funtzio bikoitza dute: alde batetik, haize-babesa dira, eta bestetik, haien artean balkoia edo etxebizitzako beste gela bat eskegita jar daitezke, espazio erabilgarria irabazteko. Harrortzak eta bilbadurak dituzten etxe barroko horiek XVII. mendean hedatu ziren eta, gaur egun, haien adierazpen garbia dugu Iriarte baserri zaharberrituan.
- Azken baserri mota sotoduna da. Maldan dauden lurretan nahita eraikitako etxeak dira, desnibela aprobetxatuz sagardo-upelak gordetzeko sotoak egiteko xedez.


Joxin Azkue

Errentenbarrendi baserriko fatxada nagusiaren bilbadura.


Salugarate baserriko fatxada nagusiaren bilbadura.

## C.2.- Baserri barrokoak

XVII. mendearen bigarren erdialdean eta XVIII. mende osoan zehar, baserriek biztanleen premia berrietara eta aurrerapen teknologikoetara egokitu behar izan zuten. Sagardo-produkzioak behera egin zuen, eta garia bigarren mailan geratu zen, indar handiz sartzen ari zen beste zereal batek baztertuta: Amerikako artoak. Sagardo-dolareak barruko espazio guztia betetzeari utzi, tamaina txikiagoa hartu, teknologia berritu eta etxearen alboko lekuetan kokatu zen.

Beste aldaketa bat baserrietako barne-egituretako pilareak desagertzea izan zen. Horien ordez, beste sistema errazago bat erabiltzen hasi ziren: zutikoak, hots, solairu arteko zutoinak. Zutoin horiez gain, egitura berriek beste elementu esanguratsu batzuk berenganatu zituzten, hala nola txardangoak, gailurrak, liran jarritako besoak eta “miru-buztan" formako mihiztadurak, beste pieza batzuen artean.

Kanpoaldean, zurezko fatxadek ez dute oraindik nagusitasuna galdu eta bilbaduradun baserriak eraikitzen jarraitzen dute, baina



**Adunibar baserriko estalkiko txardango alderantzikatua.**

berezitasun batekin: bilbadurak betetzeko adreilua erabiltzen hasi dira. Orobat, fatxada nagusietan, barrualdeko suhesien luzapena diren alboko harrortzak ageri dira. Garai hartako eraikuntzan karrerapeak ere nagusi dira, aurreko ataria irekita eta arku bat edo gehiago dituztenak, lanerako gune egokia eskaintzen baitute.

Zizurkilen oso sailkapen argia dugu, eraikuntzaren alderdi garrantzitsu batzuei erreparatuta: harri-hormazko barne-egitura eta fatxada dituzten baserriak, bilbadura eta karrerapea dituztenak eta karreraperik gabeko bilbadura dutenak.

Eredurik ohikoena fatxadan bilbadura eta karrerapea dituzten baserriak dira. Horrelakoak garai jakin batean koka ditzakegu: XVII. mendearen bigarren erdialdetik XVIII. mendearen lehen erdialdera bitartean. Andrezketa, Aretagoikoa, Aretazpikoa eta Nekola dira eredu horretakoak. Baserri horiek beheko solairua harri-hormaz egina izaten dute eta gainerako altxaera ageriko habeen bilbaduraz osatua da. Ez dute zutoinik fatxadan, tamaina txikiko piezak dira, eta, beheko solairuko karrerapea zabalegia denean, harrizko zutabeak edo zurezko zutikoak izaten dituzte.

Karreraperik gabeko bilbaduradun baserriak ere ohikoak dira eta, mota horretakoen artean, Amabi, Olentzozar eta Sarobe ditugu, Baserri horiek XVII. mendearen bigarren erdialdekoak eta XVIII. mendearen lehen hiru laurdenekoak dira. Harrizko behealdea izaten dute eta gainerako altxaera zurezko egitura armatuaz egina.

Sailkapen horretan bada azken kategoria bat: eraikin guztia harri-hormazkoa baina beheko egitura zurezkoa duten baserriak. Horiek ere beren garaiko ezaugarriak dituzte. Era horretako baserriak dira, adibidez, Azkarate, Bikarioetxezar, Iraola eta Landare, besteak beste.



**Aretazpikoa baserriko karrerapea.**



**Iraola baserriaren fatxada nagusia.**

Azkenik, XVIII. eta XIX. mendeen arteko trantsizioan egindako baserriak aipa genitzake, hala nola Elizalde, Kamioaundi eta Portxeta.

## C.3.- Baserri neoklasikoak

XVIII. mendearen bukaeratik eta XIX. mende osoan zehar, baserrien osaera erabat aldatu zen berriro. Garai horretako eraikinek solairu eta fatxaden konposizio ordenatu eta arrazionala eta estalkiraino igotzen diren harrizko hormak dituzte. Zura barnealdean soilik erabiltzen da, eta hor ere oso egitura errazak izango dira. Karrerapea desagertu da eta, horren ordez, atalondo itxi bat dago, goiko solairuetara igotzeko ate handi bat duena. Logelak bereizi, gelen artean paretak egin eta forjatuei gangak erantsi dizkiete. Barruko argiak garrantzi handia hartu duenez, gelak handiagoak dira. Baina izurriteen kutsaduraren beldur direnez, kanpoaldeko eta barrualdeko paramentuak kareztatzen hasi dira.

Zizurkilen garai hartako baserri ugari ditugu, direla une hartan eraikitakoak, direla lehengo baserri zaharberrituak, jatorrizko bolumenari eutsita baina itxura berria emanda. Horien artean honako hauek aipa ditzakegu: Agirre, Altxurriaga, Arizkurutzeta, Arritxipi, Astabere, Bidegurutze eta Errekalde.

**Etxabesaletxe baserriaren fatxada nagusia.**

## C.4.- Hormigoiaren iraultza

XX. mendeak berrikuntza handia ekarri zuen eraikuntzako materialei dagokienez: Hormigoi armatuaren iraultza. Material horrek ordura arteko eraikuntza osoa goitik behera aldarazi zuen. Horrez gain, kontuan izan behar dugu, industria-iraultzaren ondorioz, baserri berriak eraikitzeari utzi egin ziotela. Bi arrazoi horiek direla eta, 1900etik aurrera nekazaritza-paisaiak aldaketa handia jasan zuen.

Hiriguneetan bizitegi-eraikinak egiten hasi ziren, hormigoia erabiliz (Aurrera, Azkenportu, Bentaondo, Bentaundi, Bideondo etab). Horiek guztiak eraikuntza-eredu berri horretakoak ziren. Horiei Zubizarretaenea ere erantsi behar genieke, baina berezitasun batekin: etxe hori Neorregionalismo izeneko estilokoa da, hau da, hormigoia bezalako material berriak erabilita eraikia da, baina lurraldeko apaingarri tipikoak ere baditu, esaterako goiko solairuetako zurezko bilbadura.

Landa-paisaiari dagokionez, berriz, baserriak ere material berria bereganatzen hasi ziren, baina kanpoaldeko armazoiari eutsita.

XX. mendeko lehen hamarkadetan, batez ere, barnealdea berritzeko lanak nagusitu ziren baserrietan, neurri handi batean obra askoz merkeagoa zelako zuraren ordez hormigoia erabilita. Horrekin bat, eraikin berrien erosotasuna eta higienea ere bilatzen hasi ziren baserrietan. Hori dela eta, abeltzaintzan ziharduten baserrietan, abereentzako espazioak eta jendea bizitzekoak bereizten hasi ziren. Baserri batzuetan, abereentzako beheko solairua soilik zaharberritu dute hormigoia erabiliz, hango zuraren egoera txarragatik (Irizibar edo Zalduazpikoa). Beste batzuek, berriz, zaharberritze osoa jasan dute barrualdean; horietan jatorrizko egituraren arrasto guztiak desagertu eta goitik behera berregin dituzte (Alkaniz, Arangaitz, Bengoetxea, Iriarte edo Olatza). Beste kasu batzuetan, berrikiago, jatorrizko baserria bota eta orube horretan beste etxe bat eraiki dute, bizimodu modernorako egokitua (Aundizabal, Beldarrain, Burrustidi edo Egieta).



**Teodosioenea, hiriko etxe tipikoaren adibidea.**

Bestalde, ezin dugu aurrera jarraitu aurri-egoeran dauden edo dagoeneko desagertu diren baserriei aipamen berezia egin gabe, oso ugari baitira (ia laurden bat). Lehen kasuan, baserri horien kokalekua zehaztu ahal izan da, baina arrasto urriek ez dute baserri horien deskribapen zehatza egiteko bidea ematen (Atxulondo Goikoetxea, Illarratxoeta, Ipidegi…). Bestalde, desagertutako baserriei buruz (Altziturri, Birautzberri, Etxabe, Etxeberria, Fraisoro, Malkorra) edo non zeuden zehazki jakiterik ez dagoen baserriei buruz (Larrondo, Zaldundegi, Etxezarra, Barberotegi edo Etxeordekoa) datu berri gutxi eman daitezke, baserri horiek inoiz existitu zirela egiaztatzeaz gain.

Arkitektura ezberdinei begirada osoa eman eta haien katalogazioa egin ondoren, jarraian ageri den taulan Zizurkilgo baserrien sailkapen eskematikoa jasotzen da.



**Mugirozar baserria, sutearen ondorengo oin berriko eraikina.**

**Ipidegi baserriaren arrastoak.**

1. GAILUR / VIGA CUMBRERA
2. KONTRAGOLHARRI, ROI-HAGA / CORREA
3. GAPIRIO / CABRIO
4. ASTAZALDI / CABALLETE
5. PILAREA / POSTE ENTERIZO
6. ZUTABEA / PILAR
7. OHOLTZA / TARIMA
8. SOLIBAK / SOLIBOS
9. FRONTALA / CARRERA
10. TXARRANTXAK, BESOAK / TORNAPUNTAS
11. TXINDILA, TINDILA / ZAPATA
12. ZUTIKOA / PIE DERECHO
13. HORMA, PILAREHARRIA / POYO
14. ZOLATA / SOLERA
15. ZIMENDUAK / CIMIENTOS
16. OHOL ETXITURA MATXINHARATUTA DUEN HORMAPIKOA / HASTIAL CON CERRAMIENTO DE TABLAS MACHIHEMBRADAS
17. TEILATU HEGAL / ALERO
18. TARALOT / TADALCON
19. ESKANTZUAK / ESQUINALES
20. LANGETA / TRAVESAÑO
21. ZUTOIN / TRAMON
22. ZEHARRAGA / PUENTE
23. HARLANDUAK / SILLARES
24. GEZILEIHO, SAIETERA / ASPILLERA
25. TXARRANTXA, BESOA / TORNAPUNTA
26. ATEBURU / DINTEL
27. ATEZANGO / JAMBA
28. IDI-BEGI / OJO DE BUEY
29. USATEGIAK / PALOMARES
30. ARMARRIA / ESCUDO DE ARMAS
31. BALKOIA / BALCON

**Baserri tradizionalaren arkitektura osatzen duten elementuen taula.**




**Mihiztadura mota ezberdinen ereduak**

## ZIZURKILGO BASERRIEN TIPOLOGIA ARKITEKTONIKOA

### XVI. MENDEA – XVII. MENDEAREN LEHEN ERDIALDEA

**Dolare-baserriak**
Aundia
Berastegi
Iragorri
Legarralde
Zalduazpikoa

**Harrizko baserriak**
Apaizetxea
Irazugoikoa
Irizibar
Sanmillan

**Karreraperik gabeko bilbaduradun baserriak**
Adunibar
Errentenbarrendi
Plazaetxeberri
Salugarate

**Bilbadura eta harrortzak dituzten baserriak (XVII. mendea)**
Iriarte (berritu baino lehen)

### XVII. MENDEAREN BIGARREN ERDIALDEA - XVIII. MENDEA

**Bilbadura eta karrerapea dituzten baserriak**
Andrezketa
Aretagoikoa
Aretazpikoa
Larrondobuno
Nekola

**Karreraperik gabeko bilbaduradun baserriak**
Amabi
Etxeberritxo
Ihartza
Olentzarozar
Sarobe

**Harri-hormazko baserriak, zurezko egitura dutenak**
Akezkoerrota
Azkarate
Bikarioetxezar
Landare
Legargain
Loidi
Luzuriaga
Odolkierraga
Portxeta
Zalduzar

**XVIII. eta XIX. mendeen arteko trantsizioko baserriak**
Elizalde
Kamioaundi
Zubiaurretxo

### XIX. MENDEA

**Harri-hormazko baserriak, zurezko egitura dutenak**
Agirre
Alkitrai
Altxurriaga
Arizkurutzeta
Arizmendizabal
Arritxipi
Artutxaenea
Astabere
Bidegurutze
Errekalde
Etxabesaletxe
Galardi
Iraola
Larretin
Olentzaroetxeberri
Loidierrota

### XX. MENDEKO baserri zaharberritu edo berreraikiak

Abeletxe
Alkaniz
Arandabarro
Arangaitz
Argurutzea
Arizmendi
Arrieta
Aundizabal
Beibategi
Beldarrain
Bengoetxea
Burrustidi
Egieta

Elizondo
Etxeberritxikia
Etxetxo
Etzeta
Garetza
Garmendi
Gurutzeta
Irazuazpikoa
Iriarte
Iruña
Iturralde
Kamiotxiki
Loidi
Makura
Miranda
Mugirozar
Mutio
Olatza
Otazu
Pagamendi
Pagamuño
Saizar
San Miguel
Ugarte
Zaldugoena
Zarapegi
Zarateko Benta
Zearsoro
Zubimusu

**AURRI EGOERAN DAUDEN BASERRIAK**

Atxulondo
Goikoetxea
Illarratxoeta
Ipidegi
Itzumitz
Lizardi
Oiartzun
Pagamendi
Saratxoeta
Susperro
Zaratetxeberri

**DESAGERTU DIREN EDO NON ZEUDEN JAKITERIK EZ DAGOEN BASERRIAK (*)**

Altziturri
Aundiberri
Barberotegi (*)
Benezia
Birautzberri
Etxabe
Etxeberria
Etxeordekoa (*)
Etxezarra (*)
Fraisoro
Garaditxo
Larrondo (*)
Lizamuño
Malkorra
Mendigain
Mugiroberri
Sagasti
Torre
Ugare
Ugartetxeberri
Zaldundegi (*)

**HIRI ETXEAK (XX. mendea)**

Akezkoazabal
Alkortaenea
Aurrera
Azkenportu
Bentaundi
Bentaberri
Bentaondo
Bentatxuri
Bideondo
Isidroenea
Iturgain
Jauregi
Karidadeko Benta
Olentzaroberri
Pasusenea
Remigioenea
Teodosionea
Villa Encarnación
Vista Alegre
Zubimusuberri
Zubizarretaenea

## Etimologia

*Abere* eta *etxe* hitzez osatua. 1790 urtean dagoeneko *Abeleche* izenarekin aipatzen da, eta1884ean *Abeleche azpicoa* bezala.

## Kokapena

Irazu Bailaran kokatuta dago, erdi hegalean, Zarate gainera doan errepidetik gertu.



Koordenadak
UTM: X: 575105; Y: 4784479; Z: 190
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 31.6′′; Lat.: 43º 12′ 30.9′′; Alt. 190



**Baserriaren ikuspegia bidetik (1987).**


**Fatxada nagusia (2008).**


**Iparraldeko fatxada (2009).**

## Deskribapena

XX. mendean (1994 inguruan) guztiz berritutako baserria, gaur egun ostalaritzako establezimendu bat bihurtua. Jatorrizko eraikina garrantzirik gabeko solairu angeluzuzen bat zen. Eraikinari eranskin berriak gehitu zaizkio, baita beiraz hornitutako terraza zabal bat ere. Barnealdea ere erabat berrituta dago.

## Historia

Baserri honen jatorria, handik gertu zegoen Arandabarro baserriaren mendekoa zen eta 1717an dagoeneko aipatzen zen abereentzako borda zahar batean kokatu behar da (*"la borda de ganado que tienen en el paraxe llamado Eguieta gaña"*). Momentu hartan, Arandabarro baserri ondoko Iragorri oinetxeko maiorazgoan barneratuko zen. Borda 1761 urtean berreraiki eta, urteko 24 errealeko errenta baten truke soilik alokatu zen.

Borda hau berreraiki eta eraldatu egingo du bere jabeak (Francisco Maria Barriola) XIX. mendearen hasieran etekin ekonomiko handiagoak lortzeko helburuarekin (*"su borda de ganado, que oy es de habitación colonal"*). 1884 urtean beheko solairua, solairu nagusia eta ganbara dituela aipatzen da.

## Baserriaren jabeak:

Barriola, Francisco Maria & Arregi, Micaela Josefa (1823)
Mutio, Juan Francisco & Zabala, Josefa Ignacia (1842 b.l.)
Mutio, Juan Asencio & Sarobe, Francisca Javiera (1842)
Mutio, Maria Martina, Josefa Ignacia, Manuela Josefa eta Juan Bautista (1887)
Gorrotxategi, Julian (1892)
Zatarain, Ascensio (1892)
Barriola, Jose Domingo & Irazu, Micaela Antonia (1895)
Barriola, Juan Miguel, Juan Francisco (1916)
Barriola, Juana eta Juan Bautista (1979)
Otegi, Jose Joaquin & Etxabe, Elena (1981)
Juanikorena, Jose Luis & Mendizabal, Garbine (1993 b.l.)
Citibank España, S.A. (1993)
Pasaban, Sergio & Lizarribar, Begoña (1994)

# 2. Adunibar

## Etimologia

*Aduna* eta *ibar* hitzez osatua, Errekaillun edo Adunibar ubidearen ondoan duen kokapenari egiten dio erreferentzia.

Zizurkilgo Udala

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Bere izena daraman ubidearen ertzeko ibai-terraza batean, Adunako mugatik oso gertu.



Koordenadak
UTM: X: 576.215; Y: 4.783.727; Z: 68
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 42.8′′; Lat.: 43º 12′ 6.1′′; Alt. 68

**Baserriaren alboko fatxada.**

Joxin Azkue



**Baserriaren fatxada nagusia. Errota zaharraren gorputza ezkerraldean dago (2005).**




**Baserriaren airetiko argazkia 1954an. Hornikuntza kanala sumatzen da. Marra gorria, Adunako muga da.**

## Deskribapena

XVII. mendeko bigarren erdian eraikitako egitura duten baserrien tipologiakoa. Eraikina bi etxebizitzatan partekatuta dago eta kareztatutako harri-hormak eta harlanduzko eskantzuak dituen solairu angeluzuzen bat du. Kareztaduraren azpian, jatorrizko egurrezko egituraren fatxada nagusia sumatu daiteke. Bao guztiek oso antzeko trazadura dute, dekoraziorik gabe.

Errota originala iparralderago zegoen eraikinean kokatuta zegoen, nahiz eta gaur egun jarduera honen testigantza fisikorik ez geratu. Horniketa kanalaz jarraitutako trazadura bakarrik sumatzen da.

Teilatupeko solairuaren barrualdean bere egitura originalaren zati bat mantentzen da, 1976 urte inguruan eginiko berritze-lan garrantzitsuen ondorioz oso aldatuta badago ere. Egitura hau pieza bakarreko zutabeen gainean doan armadura petral batez osatuta dago eta urkilla-muntaketa bidez lotuta. Azpimarragarria da, hego-ekialdeko fatxadako goialdean oraindik irekita mantentzen den hastiala eusten duen urkila-oin berezia ere. Aipatutako erreforma-ren ondorioz, euren jatorrizko kokalekutik kanpo aurkitzen diren eta kronologikoki zaharragoak diren berrerabilitako piezak ikusi daitezke, ziridun txabetazko loturen edo "enara-buztana" moduko loturen aztarnekin.



Ignacia Bengoetxea bere seme Ignacio Agustin Mendizabalekin 1935ean.



Javier Mendizabalen ezkontza (1974).

Zizurkilgo Udala



Familia argazkia baserriaren atzealdean (1932). Erdian Ignacia Bengoetxea bere ahizpekin eta seme-alabekin.

Zizurkilgo Udala



Mendizabal anai-arrebak 1950 urte inguruan (Serapio, Ignacio Agustin, Ignacio Maria, Lina, Mikaela, Jesusa eta Fani).

Zizurkilgo Udala

## Historia

Adunibar baserriaren erreferentziarik zaharrena bere eraikuntza-ren unearekin lotuta dago, XVI. mendearen erdialdean. Zehazki, 1570 urtean, auzi bat sartuko da Juan Ruiz San Millanen kontra, bere abizeneko oinetxeko jauna, errolda ezberdinak eta beste zor batzuk ez ordaintzeagatik. Horien artean Martin Ruiz de San Millan, bere aita zena, bizi zen garaian lan batzuk egiteagatik kos-tatako 80 dukatak ez ordaintzea leporatu zitzaion *("maderamien-to del molino nuevo que he hecho y edificado en los terminos lla-mados Adunibar e Irasagasti")*.

Errota hau bere izena daraman ubidetik elikatzen zen eta gutxie-nez bi harri zeuzkan lan egiteko. Bere azken ehoketa 1965. urte-an egin zen. XX. mende hasieran bere jauzia lau zaldi inguruko zentral hidroelektriko txiki bateko sorgailua mugitzeko erabili zen (1914).

Errota honen ondoan basetxe bat zegoen eraikita, itxuraz XVII. mendearen bukaeran altxatakoa. Berau eraikitzeko helburua lur-sail honen etekin ekonomikoak handitzea izan zen, hala, nekaza-ritza eta abeltzaintzako jarduerak ehoketarekin bateratu zitezkee-lako. Adibide bezala, 1768 urtean maizterrak 960 erreal eta 2 kapoi ordaintzen zituen urteko errenta bezala eta 1835 urtean berriz 264 erreal, gari anega bat eta bi kapoi.



Hastialaren urkilaren oina (2008).

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Juan Ruiz & Ugarriaras, Maria Lopez (1570)
San Millan, Millian Ruiz & Okendo, Maria (1590)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Brigidatarren Komentua (Lasarte) (1681)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1734)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Muñoa, Marcos Antonio & Pagadizabal, Manuela Josefa (1890)
Muñoa, Miguel Paciente (1903)

**Iparraldeko ½**

Muñoa, Marcos & Ganuza, Magdalena (1948)
Izagirre, Juan (1955)
Uranga, Cecilia (1955)
Mendizabal, Serapio & Aldabe, Celestina (1959)
Mendizabal, Ignacio & Jauregi, Josefa (1985)

**Hegoaldeko ½**

Muñoa, Jose Maria & Ganuza, Carmen (1948)
Bengoetxea, Valentin (1959)
Soraluze, Julian

## Etimologia

Euskal Herrian hedatuen dauden abizenetako bat da, Agirre edo Agerre formetan erabiltzen da bereizpenik egin gabe (leku garaia edo arriskutsua).

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatua dago.



Koordenadak
UTM: X: 575757; Y: 4783483; Z: 130
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 3.2′′; Lat.: 43º 11′ 58.3′′; Alt. 130

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri neoklasikoa. Kareztatutako harri-hormak eta eskantzuetan eta sarbide baotan harlanduzko lanak dituen planta angeluzuzena duen eraikina. Fatxada ezberdinetan modu era-gabean baoak ireki dira, traza oso ezberdinak erakusten dituzte. Originalak harlanduzko lanak dituzten markoak dituzten haiek dira. Eraikin hau gaur egun hutsik dago eta arrazoi horregatik ezin izan da bisitatu. Hala ere, barnealdeko egitura oso aldatuta dagoela sumatzen da, oso traza sinplea du zapataz eutsitako habe petralekin eta egurrezko zutikoekin.


Joxin Azkue

Baserriaren alboko fatxada (2005).


Joxin Azkue

Atzealdeko fatxada (2004).

## Historia

Agirre baserriari buruzko lehen datuak XVI. mende amaierara garamatza, 1590 urtera. Hala ere, bi mende lehenago, 1390ean, dokumentazioak Ihoan d'Aguirre abizena duen bizilagun baten berri ematen du, Zizurkil Tolosako herribilduan auzotzeko akta batean parte hartu zuelarik, hortaz, posible da baserria dagoeneko eraikita egotea.
1740 urtean, Maria Luzuriaga, Juan Lizarragaren alargunak, eraikinaren jabeak, baserrian maiorazgo bat sortzea erabaki zuen bere jabetzen segurtasuna bermatzeko eta bere arbasoen memoria mantentzeko.
Bere jabeek eraikina alokatu zuten eta denboraren poderioz alokairu-baldintzak aldatuz joan ziren. XIX. mende hasieratik behintzat, eraikina bi etxebizitza independentetan banatu zen etekinak handitzeko. 1773an, urte osorako 15 errealeko 20 pisu, 11 gari anega eta 15 arto anega eta 2 kapoi entregatu behar zituen maizterrak eta 2 karobi egin behar zituen bere lurrak ongarritzeko. 1835 urtean, kopuru horiek 80 dukat, 19 gari anega eta 2 kapoira igo ziren.
1992an baserriaren Iparraldeko erdia ukuilu eta biltegi bihurtuta geratu zen, bitartean jabeek inguruan bi etxebizitza berri eraiki zuten (Intxaurgain eta Aitzazpe).


Zizurkilgo Udala

Maria Antonia Izagirre bere seme-alabekin -Josepa eta Pedro Otegi- baserritik gertu (1918).


Zizurkilgo Udala

Familia argazkia baserri zaharraren parean (1948). Pedro Otegi eta Maria Ignacia Beloki euren seme-alabekin: Juan Jose, Jose Maria, Antonia, Juana, Maria Angeles, Maria Dolores eta Fermin.

## Baserriaren jabeak:

Agirre, Santuru & Agirre, Mari Miguel (1590)
Agirre, Domingo & Etxeberria, Maria Joan (1615)
Agirre, Miguel (1650)
Agirre, Francisca & Luzuriaga, Juan & Etxabe, Juan (1686 b.l.)
Luzuriaga, Maria & Lizarraga, Juan (1686)
Lizarraga, Sebastian & Etxenagusia, Maria Luisa (1740)
Etxabe, Maria Francisca & Etxabeguren, Martin (1773)
Etxabeguren, Juan Bautista (1779)
Etxabeguren, Nicolas & Aizpurua, Francisca (1815)
Etxabeguren, Francisco & Rekondo, Juana Francisca & Ezeizabarrena, Agustina (1829)
Etxabeguren, Francisco Antonio, Pedro Miguel eta Maria Melchora (1859)
Arzuaga, Lucio & Sorarrain, Maria Ignacia (1893)
Arsuaga, Dionisia & Sese, Jose Luis (1901)

**Hegoaldeko ½ (Agirre Goikoa)**
Otegi, Pedro & Beloki, Maria Ignacia (1948)
Otegi Beloki sendia

**Iparraldeko ½ (Agirre Bekoa)**
Sese, Ramon (1967)
Intxausti, Jose Antonio; Intxausti, Jose Maria (1985)

# 4. Akezkoerrota

## Etimologia

Ustez *aketx* (ebakia edo mozketa) hitzaz osatua. Dokumentazioan *Aquezcoa* edo *Aquescoa* bezala agertu ohi da.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago.

Asteasuko errekako ibai-terraza estu batean.



Koordenadak:
UTM: X: 576242; Y: 4782585; Z: 61
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 42.2″; Lat.: 43º 11′ 29″; Alt.: 61


Joxin Azkue

Errota hornitzen duen kanala (2006).

## Deskribapena

XVIII. mendean eraikitako egurrezko egitura duen harri-horma motako baserria da, duela gutxi berriztatze handi bat jasan du. Planta angeluzuzena du eta alboetako fatxadetan eta iparraldeko fatxadako beheko solairuan *cara vista* harri-hormak ditu, gainerakoa kareztatuta dago. Eskantzuetan eta jatorrizko baoen markoetan harlanduzko-lanak ditu. Dekorazio motiboek eta sarrera nagusiko teilapeak duela gutxikoak dirudite.

Eraikina errota bezala diseinatua izan zen eta oraindik bere horretan mantentzen ditu bere jatorrizko egitura eta ia 400 metroko luzera duen (217 lurrazpian eta 173 estali gabe) hornikuntza kanala, antepara eta irteera estoldako arkuak, eta zenbaitetan oraindik ere martxan jartzen da.

Barrualdean eginiko erreformari esker museo bat bihurtu dira errota zaharreko makinak, balantza zaharrak eta jatorrizko pisu bilduma on bat. Gainerako egitura duela denbora gutxikoa da.



Duela gutxi zaharberritua izan den ehotze aretoa (2008).

## Historia

Akezko-errotak XVII. mende amaierakoa edo XVIII. mende hasierakoa dirudi eta lehenengo erreferentzia 1703 urtekoa da. Errota honek bi gurpil zituen (orain burdinezko gurpiltxoak) eta hauei esker hiru harri pare -ondoren bi izan ziren- mugitu zitezkeen. Era berean, XX. mende hasieran energia elektrikoa sortzerko erabili zen (4 eta 7 zaldi artean 1914an).

Errota Udalaren jabetzakoa zen eta urtero errentan jartzen zuen. 1749an Joanes Etxeberriak 64 dukat, Erramu Egunerako gari anega bat, Corpus egunerako 40 bolbora libra, abuztuko Andre Maria jaietan korritzeko zezen bat eta eskatzen zitzaionean su artifizialak botatzeko (*"veinte fuegos artificiales o goettes"*) konpromisoa hartu zuen. XIX. mende hasieran Udalak saldu egin behar izan zuen gerra napoleonikoek eragindako zorrei aurre egin ahal izateko. Jose Manuel Arizmendik 1810 urtean erosi zuen.

Historian zehar eraikinean eta bere azpiegituretan hainbat obra eta berreraikitze egin dira, are gehiago, errentetatik lortutakoaren zatirik handiena lan horietarako erabili zen. Azpimarragarrienak 1731 urte inguruan burutu ziren eta garai hartan oso ezaguna zen hargin batek eraman zituen aurrera (Martin Agirre). Litekeena da eraikin hura gaur egun ezagutzen dugun bera izatea.


Kutxa Fototeka

Baserriaren ekialdeko fatxada estoldako arkuekin (1994).

## Baserriaren jabeak:

Udala (1703)
Arizmendi, Jose Manuel & Zuloaga, Mariana (1810)
Arizmendi, Juan Pedro & Barriola, Maria Salvadora & Lizarraga, Francisca Ignacia (1818)
Arizmendi, Joaquin & Lejaristi, Micaela Ignacia (1854)
Arizmendi, Juan Bernardo & Jauregi, Magdalena (1888)
Arizmendi, Jose & Azkue, Sebastiana (1934)
Arizmendi, Jose Maria & Oiarzabal, Maria
Arizmendi, Lourdes (1987).

## Etimologia

*Alcaniz* formulapean ageri den baserria, *Alcañiz* edo *Arcaniz* aldaerekin.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Izen berbereko errekaren alboan dagoen ibarrean.




Koordenadak:
UTM: X: 575294; Y: 4782995; Z: 76
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 24′′; Lat.: 43º 11′ 42.7′′; Alt.: 76



Joxin Azkue

**Baserriaren fatxada nagusia (2004).**

## Deskribapena

2005 urte inguruan guztiz berritu zen baserri hau. Jatorrizko hormak adreiluz estaliak izan dira eta baoen banaketa ere partzialki aldatu da. Barnealdea ere erabat aldatuta dago.
Jatorrizko errotaren arrasto bakarrak etxeko barrualdean berreskuratu diren puntu erdiko beheratutako arku bat eta irintzeko bi gurpil dira.

## Historia

Eraikina jatorrian irin-errota bezala eraiki zen XVII. mende amaieran edo XVIII. mende hasieran. Alkaniz ubidearen gainean kokatutako presa bat zuen, baita hornidura kanala, ura biltzeko antepara eta irintzeko bi harri (bata gariarentzako eta bestea artoarentzako ere). XX. mende hasieran energia elektrikoa sortzeko erabili zen (4 zaldi 1914 urtean).



Joxin Azkue

**Baserriko alboko fatxada (2004).**

Udalaren jabetzakoa zen eta urtero errentan jartzen zuen eskaintza onena egiten zuenarentzat. 1749 urtean Domingo Zubiaurrek 20 dukat, Erramu Egunerako gari anega bat, Corpuserako 40 bolbora libra eta abuztuko Andre Maria jaietan korritzeko zezen bat eta eskatzen zitzaionean su artifizialak botatzeko (*"diez fuegos artificiales o goettes"*) konpromisoa hartu zuen errenta moduan. Zorrek bultzata, Udalak Juan Ignacio Loinazi saldu zion 1811 urtean eta orduz geroztik partikularrek ustiatu zuten. Bere azken ehoketa 1962 urte inguruan izan zen.



**Duela gutxi berritutako ehoketa aretoa (2008).**

## Baserriaren jabeak:

Udala (1703)
Loinaz, Juan Ignacio & Alkain, Josefa Antonia (1811)
Loinaz, Juan Bautista & Arizmendi, Maria Magdalena (1836)
Errotaren ½
Urkia, Jose (1846)
Irazu, Juan Jose (1940)
Errotaren ½
Urkola, Joaquin Ignacio & Urkola, Manuela Josefa & Gereñu, Maria Joaquina (1846)
Urkola, Miguel Maria; Jose Manuel; Maria Martina (1853)
Irazu, Miguel Maria & Alduntzin, Maria Jacinta (1915)
Irazu, Juan Jose & Pagola, Maria Concepción (1940)
Irazu, Maria Carmen; Irazu, Maria Concepción (1991)
Construcciones Pagamuño (1998)
Otxoa, Guillermo & Rotaetxe, Ana Leticia (2004).

## Etimologia

Jatorrian baserria *Asteguin Zabalberri* (1830) izenarekin aipatzen da, kokatuta dagoen mendixkari erreferentzia eginez.

Joxin Azkue

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago, Fraisoro inguruan. Villabonako mugatik gertu dagoen mendixka baten hegalean.



Kooordenadak:
UTM: X: 575930; Y: 4782334; Z: 127
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 56.1″; Lat.: 43º 11′ 21″; Alt.: 127


Patxi Otegi

Baserriaren alboko fatxada (1987).

## Baserriaren jabeak:

Garbuno, Jose Ignacio & Etxeberria, Maria Cruz (1816)
Arizmendi, Juan Pedro & Barriola, Salvadora & Lizarraga, Francisca (1830)
Villar, Juan Ignacio & Mujika, Fabiana (1891)
Villar, Maria (1899)
Aiestaran, Francisco & Intxausti, Bernardina (1910)
Aiestaran, Remigia (1942)
Dorronsoro, Antonio (1951)
Garmendia Dorronsoro sendia

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserria. Bere eraikuntza oso sinplea da, oinplano angeluzuzena du eta erantsi bat dauka mendebaldean. Kanpoko hormak kareztatuta daude. Baoen banaketa erregularra da eta guztiak oso sinpleak dira.

## Historia

*Asteguin Zabalberri* baserria XIX. mende hasieran eraikia izan zela uste da, Jose Ignacio Garbunok aldez aurretik Udalari erositako lur-sail batean. Ez dago bere inguruko datu askorik, garrantzia gutxiko berrikuntza batzuk kenduta.


Joxin Azkue

Baserriaren alboko fatxada (2006).

# 7. Altxurriaga

## Etimologia

Bere izenaren jatorriari erreparatuz, *altza* eta *rriaga* atzizkiaz osatuta dago. Baserri hau, denboran zehar, izen ezberdinekin ageri da dokumentuetan *Arrichuriaga* (1618), *Alchurriaga* (1731), *Arrichiriaga* (1742) edo *Altzurriaga* (1877).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Arripilleta mendixkaren erdi magalean, Aia eta Asteasurekin muga egiten duen tokitik gertu.



Koordenadak:
UTM: X: 573012; Y: 4786581; Z: 289
Geografikoak: Luz.: -2º 6′ 3.4″; Lat.: 43º 13′ 39.7″; Alt.: 289


Joxin Azkue

**Baserriaren alboko fatxada (2006).**

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri neoklasikoa. Oinplano angeluzuzeneko eraikin sinplea da, hondatutako mortero kapa batez erdi estalita dauden harri-hormekin. Harlanduzko eskantzuak ditu. Baoek oso diseinu sinplea dute eta nahiko modu homogeneoan daude banatuta. Alboetako bi fatxadetan ataripe bana eta beste eraikin baten gorputza gehitu dira (ipar-ekialdeko fatxada), multzoa deformatzen duten material modernoak erabiliz eginikoa.

Barnealdeari dagokionez, gune interesgarri bakarra teilatupea da: goihabearen pisua eusten duten zapatadun zutiko multzo bat du eta kontragoihabea astazaldiz eutsita dago, ziri-kaxa eta kijera erdira doazen muntaia lotura sinpleak erabiliz.



**Estalkiaren egitura zutikoarekin eta alboetako astazaldiekin (2008).**

## Historia

Altxurriaga baserriaren izendapenik zaharrena topatzeko XVII. mende hasiera baino urrunago jo beharko dugu. Orduan, Zizurkilgo kontzejuak hiribildu titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserri zerrenda batean ageri da: *"la casa de Arrichuriaga"* (1618). Hala ere, ez dirudi gaur egun duen kokapena jatorrizko kokapena denik mende horren amaieran Kontzejua eta San Millango jaunaren artean izandako auzi batetik ondorioztatzen denaren arabera. Auzia parte bakoitzaren saroien neurrien ingurukoa zen eta ondoko erreferentzia topatu daiteke bertan: *"la casa y suelos y paredes viejas demolidas de Arichuriaga la Vieja"* Andrizqueta saroitik gertu kokatuta. Hau 1542 urtean dagoeneko eraikita zegoen. Badirudi eraikina eraitsia izan zela eta berri bat altxa zutela gaur egun duen kokalekuan, nahiz eta hau guztiz berreraikia izan zen XIX. mendeko momenturen batean.

Eraikina Udalaren jabetzakoa izan zen eta aldizka errentan jartzen zuen. 1724 urtean Gabriel Aldakori entregatu zitzaion ondorengo errentaren truke: 40 dukat, mintegien zainketa eta aitzurtzea eta abuztuko jaietarako zezen bat eta ahari bat. Mende erdi beranguago, 1790 urtean, Agustin Zulaikak jarraian aipatzen den konpromisoa hartu zuen: urteko 75 dukat eta bere lurrak ongarritzeko karobi bat egitea. Udalak zituen zorrak zirela eta, basetxea saldu behar izan zuen eta 1796 urtean San Millango markesak erosi zuen.

### Baserriaren jabeak:

Udala (1618)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1796)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baroia (1877)
Irazusta, Juan Jose & Alkain, Josefa Antonia (1939)
Irazusta, Jose Maria & Arruti, Luisa (1966)
Irazusta, Juan Jose

## Etimologia

Altza eta *itur* (iturri) hitzez osatua. Alçiturri (1699) edo Alzaiturri (1736) bezala izendatuta agertzen da.

Joxin Azkue

**Baserriaren kokapenaren ikuspegi orokorra (2005).**

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta zegoen. Gaur egun "Wangner-Perot" enpresa aurkitzen den kokalekutik metro batzutara zegoen, Altziturri errekaren alboan.




Koordenadak:
UTM: X: 575138; Y: 4783351; Z: 87
Geografikoak: Luz.: -2° 4′ 30.7″; Lat.: 43° 11′ 54.3″; Alt.: 87




Baserria 1974 urtean. Atzealdean Salugarate ikusten da.




Baserriaren aire-bista bere eraispenaren aurretik (1954)

## Deskribapena

Gaur egun desagertuta dagoen baserria industrialde bat eraikitzeko eraitsi zen. Argazki zaharrei esker, harri-hormak eta eskantzuetan harlanduzko lanak zituela eta oinplano angeluzuzena zuela dakigu, gutxienez 3 solairu zituen.

## Historia

Baserria 1618 urtean izendatzen da dagoeneko, Zizurkilgo kontzejuak hiribildu titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserri zerrenda batean ageri baita. Mende honen amaieran eraikinaren jabea zen Juan Larrondobunok baserria berreraiki zuela dirudi (la *"cassa nueba de Alçiturri"* -1699-). Ondoren, Larrondobuno oinetxeko maiorazgoan sartuko da, Odolkierraga baserriarekin batera.

1712an bere jabeek errentan jarri zuten ondorengoaren truke: 46 dukat, 2 kapoi eta 24 sagarrondoren landaketa eta lurrak ongarritzeko karobi bat egitea. Mende erdi beranduago, 1773an, errenta igo egin zen: 70 dukat, 4 kapoi, 6 gaztañondo eta 6 sagarrondoren landaketa eta karobia egitea.

## Baserriaren jabeak:

Larrondobuno, Ignacio & Zatarain, Maria (1645)
Larrondobuno, Juan & Ihartza, Catalina (1687)
Larrondobuno, Martin & Etxenagusia, Isabel (1710 b.l.)
Larrondobuno, Juan & Yarza, Catalina (1710)
Larrondobuno, Juan Martin & Gandarias, Maria Ignacia (1717)
Larrondobuno, Martin Manuel & Furundarena, Maria Josefa (1775)
Larrondobuno, Jose Antonio (1830)
Larrondobuno, Manuel Bernardo & Rekondo, Francisca Antonia (1847 b.l.)
Larrondobuno, Jose Antonio & Arbildi, Ramona (1847)
Muñagorri, Jose Miguel (1854)
Muñagorri, Jose Francisco & Larrunbide, Juana Francisca (1857)
Muñoa, Marcos Antonio & Pagadizabal, Manuela (1877)
Muñoa, Juan Cipriano eta Miguel (1880)
Muñoa, Marcos (1948)
Irazusta, Ramon (195….)
Arregi, Bernardo (195…..)
Irazusta, Teodoro, Jose Maria, Maria Josefa, Ana Maria, Jose Agustin eta Juana (1970)

# 9. Amabi

## Etimologia

Dokumentazioan, baserri honetaz hitz egiterakoan, gaur egun duen formulazioa erabiltzen da, eta hau *Amariechea* (1668) izenetik eratorria izan daiteke.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Villabona eta Zizurkil lotzen dituen errepide alboko zabalune handi batean.



Koordenadak:
UTM: X: 575654; Y: 4783643; Z: 116
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 7.7′′; Lat.: 43º 12′ 3.5′′; Alt.: 116

## Deskribapena

XVIII. mendean eraikitako egitura duten baserrien motakoa. Oinplano karratuko eraikina da, *cara vista* harri-hormekin ekialdeko fatxadan eta hegoalde eta mendebaldeko fatxadetako beheko solairuetan. Gainerakoa kareztatuta aurkitzen da eta berriki margotua izan da. Harlanduzko lanak mantentzen ditu beheko solairuko eskantzuetan, eta goikoetan berriz egurrezkoak dira, beranduago eginiko erreforma baten ondorioz. Mendebaldeko fatxadako beheko solairuan sarbide bat dago eta bertako markoa eta ateburuak monolitoko harlanduzko lanak ditu. Bestalde ekialdeko fatxadak egurrezko egitura berezi bat du eta bao multzo bat enkuadratzeko erabili da. Gainera, bere erdialdean adreiluz itxita aurkitzen da. Ekialdeko fatxadaren kontra terraza moduko gehigarri bat dago goiko partean.



Ekialdeko fatxadaren egituraren xehetasuna (2009).



Baserriaren mendebaldeko fatxada (2009)

## Historia

Amabi baserriari buruz dauden datuei esker XVII. mende erdialderaino joan gaitezke. Orduan bere errentamenduari buruzko erreferentzia bat egiten da (1668). Hala ere, mende bat lehenago Joanes de Amabi izeneko bizilagun baten erreferentzia topatu daiteke, hortaz, pentsatu daiteke une hartan dagoeneko eraikita zegoela (1543).

XVIII. mende erdialdean sinatutako akordio baten arabera, baserri hau San Millan jaunaren lurretan eraikia izan zen eta honek, enfiteusi-zentsu bezala utzi zuen. Hala, 1773an Gabriel Ameztoik, bere jabeak, eta San Millan markesaren administratzaileak jabetza multzo baten permuta egingo dute, Ameztoiri emango zaio (*"para añadimiento de la su casa nombrada Amabi"*).

1887an etxea honela dago osatuta: beheko solairua (atalondoa, ogiarentzako labea, ukuilua eta sutegia), solairu nagusia (egongela, 2 logela, beste bi gela eta sukaldea), bigarren solairua eta ganbara.



Zizurkilgo Udala

Jose Ramon Balda soldadutzan, besoa altxata (1934).

## Baserriaren jabeak:

Arrate, Juan & Arzadun, Maria (1668)
Azkarate, Juan Perez & Zubelzu, Gracia (1704 b.l.)
Elizalde, Catalina (1704)
Ameztoi, Gabriel & Izagirre Andrezketa, Dominica (1728)
Ameztoi, Gabriel & Zaldua, Maria Ignacia (1746)
Ameztoi, Martin Jose & Laskibar, Maria Micaela (1776)
Ameztoi, Manuel Fermin & Ihartza, Atanasia (1822)
Ameztoi, Jose Benito (1862)
Ameztoi, Antonino (1905)
Ameztoi, Vicente & Terrados, Blanca (1947)
Balda, Ana Josefa & Arruti, Ascensio (1950)
Arruti, Juana Maria & Kotajarena, ....
Kortajarena, Amaia (2002 b.l.)
Arruti, Juana Maria (2002)

# 10. Andrezketa

## Etimologia

Etimologikoki ez dago izen honen jatorriaren inguruko ziurtasunik. Izena mantendu egin da aldaketa gutxirekin *Andrizqueta* (1475), *Andrechqueta* (1625) edo *Andresqueta* (1769).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Ikuspen handiko eremu batean hegal erdian kokatuta dagoen zabalune batean.



Koordenadak:
UTM: 574636; Y: 4784427; Z: 162
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 52.4′′; Lat.: 43º 12′ 29.3′′; Alt.: 162

## Deskribapena

Ataripekodun egitura duen baserrien motakoa. Oinplano angeluzuzena du, harri-horma eta harlanduzko lanekin. Eskantzuak harlanduzkoak dira eta bao guztien markoak ere bai, berriagoak diren batzuk kenduta.

Eraikin honetan bi eraikuntza fase ezberdindu daitezke. Zaharrena ipar eta mendebaldeko fatxadetako hormetako harlanduzko lanetan apreziatzen da, bertan hainbat gezileiho irekitzen dira eta harlanduzko lanezko markoak dituzten bao berantiarrago batzuk ere bai. Gainera dobelatutako arku baten bidez sarrera bat zegoela dirudi, atari barruan hegoaldeko horman JHS (Ihesus) inskripzioa duen arku batean apreziatzen denaren arabera.

Eraikin hau XVI. mende amaieran edo XVII. mendearen hasieran altxata zegoen. Jatorrizko eraikin hau handitzeko lan garrantzitsuak egin ziren XVIII. mende erdialdean, hegoalderantz hedatu zen, puntu erdiko arku moduko bi sarrera zituen atari bat osatuz. Hegoaldeko fatxadan, beheko solairuan, dobelatutako puntu erdiko arku bat duten hiru bao eta okulu bat daude.

Barrualdean, egurrezko egitura egoera onean mantentzen da. Planta bakoitzean sekzio handiko zapatadun zutikoz osatuta dago egitura eta aipatutako bigarren eraikuntza faseari dagokio. Teilatupean zutiko hauek goihabea eta habe petralak eusten dituzte eta horietatik ateratzen dira erdiko astazaldiak eta alboetakoak, hauek lotzeko kijera eta txabeta moduko loturak erabiliko dira. Hastiala eusten duten pilareek soilik dituzte besoak, eta hauek kaxan eta espigan lotuko dira. Pilareetako batzuetan jatorrizko egituran erabilitako “enara-buztana” moduko loturen arrastoak sumatu daitezke.


Zizurkilgo Udala

**Juan Bautista Argaia eta Maria Dolores Eizmendiren arteko ezkontza (1966).**


Zizurkilgo Udala

**Juan Bautista Argaia, Juan Bautista bere bilobarekin (1935).**


Zizurkilgo Udala

**Miguel Domingo Argaia, Juan Bautista bere semearekin belarra biltzen (1942).**

## Historia

Andrezketa baserriari buruzko datu historikoak ez doaz XVI. mende amaiera (1595) baino haratago. Hala ere, mende bat lehenago Lope de Andrizqueta abizena duen bizilagun bati erreferentzia egiten zaio, 1475 urtean Zizurkil Tolosako hiribilduko parte izateko auzotasun aktan parte hartu zuelako hortaz, ziurrenik, baserria eraikita egongo zen ordurako. Baserri hau Zizurkilgo jatorrizko 20 oinetxeetako bat da, eta ondorioz, armarri heraldikoa izateko eskubidea du.

Bere historiako pasarterik azpimarragarriena 1769 urtean jazo zen, Juan Antonio Larrondobuno, bere jabea, Maria Magdalena Beldarrainekin ezkondu eta oinetxe honen gainean maiorazgo bat sortu zutenean. Gertaera honek bat egin izan zezakeen momentu historiko horretan eraikinean aurrera eramandako erreformarekin (egitura handitu egin zen kanpoaldean eta barrualdea erreformatu zen). 1898 urtean eraikinak ondoko egitura zuen: beheko solairua (sukaldea, 2 gela eta ukuilua); solairu nagusia (egongela 1, 3 logela, aletegia) eta ganbara.

Bere jabeek eraikina errentan jarri zuten, hasieran kolono bakar bati eta XVIII. mende amaieratik aurrera bi zatitan banatuta, etekin gehiago lortzeko. Horrela, 1816 urtean, Domingo Miranda eta bere semeak errentan zuten baserriaren erdiagatik 15 errealeko 40 pesa eta 3 gari anega ordaindu behar zuten urte osorako, eta Miguel Antonio Aranburuk 50 dukat eta 2 kapoi entregatu behar zituen bere erdiagatik.



Atariko barnealdea (2008).



Zizurkilgo Udala

**Miguel Domingo Argaia eta Maria Altuna baserritik gertu (1942)**



Estalkia eusten duen egitura (2008).


Jatorrizko baserriaren harlanduzko hormatala (2008).

## Baserriaren jabeak:

Andrezketa, Maria Domingo & Izagirre, Joanes (1595)
Izagirre Andrezketa, Martin & Goieneta, Maria Perez (1647)
Izagirre Andrezketa, Francisco & Larrarte, Luisa (1664)
Izagirre Andrezketa, Juan & Aizpea, Teresa (1693)
Izagirre Andrezketa, Maria Francisca & Larrondobuno, Juan Manuel (1731)
Larrondobuno, Juan Ignacio & Etxabeguren, Mariana (1751)
Larrondobuno, Juan Antonio & Beldarrain, Maria Magdalena (1769)
Larrondobuno, Maria Manuela & Urruzola, Juan Domingo (1797)
Urruzola, Jose Antonio (1827)
Urruzola, Jose Maria & Gamon, Josefa Antonia (1837)
Urruzola, Maria Ascensión & Iztueta, Juan Ignacio & Ezpeleta, Pedro Jose (1837)
Iztueta, Martina Antonia & Abina, Andres (1857)
Abina, Pedro (1898)
Abina, Maria Presentacion (1925)
Argaia, Juan Bautista & Goikoetxea, Juana Josefa (1926)
Argaia, Miguel Domingo & Altuna, Maria Micaela (1932)
Argaia, Juan Bautista (1958)
Argaia Eizmendi sendia


Ekialdeko fatxadetik atarira sartzeko arkua (2008)

# 11. Apaizetxea

## Etimologia

Izendapenak bere ohiko erabiltzaileari erreferentzia egiten dio eta *apaiz* eta *etxe* hitzetatik eratorrita dago: "apaizaren etxea". Eraikin hau Elizgain izenaz ere ezagutzen da.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago,
Herrigunetik gertu. Hegal erdiko zelaigune
batean, herriko hirigunea menderatuz.




Koordenadak:
UTM.: X: 575271; Y: 4783659; Z: 123
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 24.7″; Lat.: 43º 12′ 4.2″; Alt.: 123



Baserriaren kokalekua (2005).

## Deskribapena

Baserri errenazentista, XVII. mendeko lehen erdian harriz eraikiak izan ziren baserrien motakoa. Kareztatutako harrizko hormak eta eskantzuetan eta bao guztietako markoetan harlanduzko lanak dituen oinplano angeluzuzeneko eraikina.

Hegoaldeko etxaurre nagusiko simetriak eraikin barroko bat ekartzen du gogora, bi idi-begi eta lau balkoi korriturekin. Simetria hau hautsi egiten da atzeko iparraldeko fatxadan lehen eta bigarren solairuko baoak desagertzen dira, nahiz eta teilatupeko oinean bi idi-begi dauden irekita (erreforma?). Beranduago, etxaurre nagusian, balkoi korritu batzuk gehitu zaizkio.

Eraikinaren barne-egitura erabat berritu zen duela 30 urte, baina jatorrizko egituraren zati handi bat mantendu egin zen. Beheko solairuan osoko habe handi bat dago, pilareharri batean zurkaiztua, eta honi habe frontala lotzen zaio erdi kijerara, kaxa-espiga lotura erabiliz txarrantxekin eta egurrezko orratzekin elkartuta dago. Teilatupeko oinean ere, egitura osoko pilareez osatuta dago eta hauek habearte bakoitzeko kontragoihabeak eusten dituzte. Pisua astazaldiez lagundutako pilareen artean banatzen da kaxa eta espiga loturen bidez. Astazaldiak pilareekin lotzen dira kijera bidez edo kaxa eta espiga moduan. Habe, pilare eta txarrantxa guztiek oso bistan dagoen arotzaren marka dute.


Fatxadan nagusiko harlanduzko lanak dituzten baoen markoak (2008).


Teilatupeko oineko osoko pilarea erdiko eta ertzetako astazaldiez lagunduta (2008).

## Historia

Apaizetxea baserriari erreferentzia egiten dieten datuak XVII. mende hasierara garamatzate, Zizurkilgo kontzejuak hiribildu titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserri zerrenda batean ageri baita (*"la casa de Abadia"* 1618).

Eraikina, bere izenak adierazten duen bezala, handik gertu aurkitzen zen elizari lotuta egon zela pentsa liteke, eta herriko erretoreen bizileku izateko eraikia izan zela. Elizaren gainerako jabetzekin gertatu bezala, eraikina desamortizatua izan zen ziurrenik XVIII. mende amaieran eta pertsona partikular bati saldu zitzaion.


Arotzaren markaren xehetasuna teilatupean (2008).

### Baserriaren jabeak:

Ameztoi, Martin Jose & Laskibar, Maria Micaela (1776)
Ameztoi, Manuel Fermin & Ihartza, Atanasia (1822)
Ameztoi, Jose Benito (1862)
Ameztoi, Antonio (1905)
Ameztoi, Vicente (1947)
Balda, Jose Ramon (1950)
Goenaga, Bernardo & Imaz, Maria Milagros
Jabekide ezberdinak

# 12. Arandabarro

## Etimologia

*Aran* eta *berro* hitzez osatua. Arandaberro (1696) aldaera ere erabiltzen da.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Hegal erdian,
Zarate gainera igotzeko errepidetik gertu.



Koordenadak:
UTM.: X: 575150; Y: 4784284; Z: 183
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 29.7″; Lat.: 43º 12′ 24.5″; Alt.: 183

## Deskribapena

XX. mendean (1998 inguruan) jatorrizko ildo orokorrak mantenduz berritutako baserria. Oinplano angeluzuzeneko eraikina, beheko solairuan *cara vista* harri-hormak ditu eta lehen solairuan eta teilatupekoan zarpiatu eta kareztatutako hormak ditu. Eskantzuetako harlanduzko lanak mantentzen ditu eta bao guztiek harlanduzko lanen imitaziozko plakatutako markoak dituzte. Barnealdea erabat aldatuta dago.

## Historia

Arandabarro baserriari buruzko aipamenik zaharrena XVII. mende amaierakoa (1696) da eta urte batzuk lehenago Martin Iraragorri kapitainak eraikia izan zela uste da. 1717 urtetik aurrera kapitain berberak Iragorriko maiorazgoan sartu zuen, bere abizena daraman oinetxetik eta ganadu bordatik (aurrerago Abeletxe) gertu, bere historia hauei guztiei lotuta egon da.
Familiako ondarea kargatzen zuten zor kopuru handiak mehatxatuta, bere jabeek eraiki berria izan zen *Sarobe-choeta* (Saratxoeta) basetxea saldu behar izan zuten zorrak kitatzeko. 1974 urte inguruan basetxea etxebizitza bihurtu zuten.


Zizurkilgo Udala
Ramon Artola, Arandabarroko maizterra, Bitori Azkaratekoa bere lagunarekin baserriko atean (1947).


Zizurkilgo Udala
Baserriaren fatxada nagusia bere erreformaren aurretik (2000).


Patxi Otegi
Baserriaren atzealdeko ikuspegia (1987).

## Baserriaren jabeak:

Irarragorri, Martin & Larrondobuno, Sebastiana (1696)
Barriola, Juan Perez & Garagaza, Ana Maria (1749)
Barriola, Francisco Antonio & Ostolaza, Maria Salvadora (1761)
Barriola, Juan Perez & Ameztoi, Juana Bautista (1796)
Barriola, Francisco Maria & Arregi, Micaela Josefa (1832)
Zarraluki, Juan Domingo & Sarriegi, Joaquina (1844)
Zarraluki, Juana Josefa & Sarasola, Florencio (1854)
Zarraluki, Francisca Ignacia (1884)
Sarasola, Miguel & Labaien, Antonia (1888)
Sarasola, Natividad, Jesusa, Justa, Juana, Valentina eta Maria (1898)
Elizegi, Juan Jose (1920)
Barriola, Juana Calixta (1920)
Barriola, Nieves Francisca (1938)
Barriola, Juana Juliana (1942)
Barriola, Eleuteria & Ormazabal, Julian (1945)
Agirre, Benito & Arzalluz, Maria Antonia (1970)
Agirre, Koro (1980)
Otermin, Martin & Beldarrain, Isabel (1998)

# 13. Arangaitz

## Etimologia

*Aran* eta *gaitz* (eremu aldapatxua) hitzek osatua.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago.
Urkamendi mendiaren oinetara dagoen sakonune batean.

Koordenadak:
UTM: X: 575664; Y: 4783175; Z: 133
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 7.5″; Lat.: 43º 11′ 48.4″; Alt.: 133




Zizurkilgo Udala

Baserriaren fatxada nagusia berritu aurretik (2000).

## Deskribapena

XX. mendean berritutako baserria da eta ez du jatorrizko eraikinaren arrastorik mantentzen. Gaur egun etxebizitza ezberdinetan banatuta aurkitzen den oinplano angeluzuzena du. Bere kanpo nahiz barnealdeko egitura material modernoez egina dago. 1894 urtean beheko solairua, solairu nagusia eta ganbaraz osatuta zegoen eta azken hau logeletako sabaien gainean oholeztatuta zegoen.

## Historia

Baserri honen inguruko lehenengo erreferentzia historikoa XVII. mende hasierakoa da, 1618 urtean Zizurkilgo kontzejuak hiribildu titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserri zerrenda batean ageri baita (*"la casa de Arangaiz"*). Urte batzuk lehenago, 1577 urtean, dokumentazioan Gracia de Arangaiz izeneko bizilagun bati egiten zaio erreferentzia, beraz, urte hartan etxea dagoeneko eraikita zegoela pentsatu daiteke.

Eraikina guztiz berreraikiko du Andres Agirrek XVIII. mende erdialdean, 1749 urte inguruan, ustekabeko sute batek erabat suntsitu ondoren. Berreraikitako eraikin hau gaur egun ezagutzen dugun baserriaren aurretikoa izan zen ziurrenik. 1752 urtean Agirrek Jose Iraolari alokatu zion basetxea. Honek urteko errenta bezala ondorengoa eman behar zion: 30 dukat, 2 kapoi, sagarrondo bat hesitu, 4 sagarrondo landatu eta karobi bat egin lurrak ongarritzeko.

## Baserriaren jabeak:

Sarasti, Miguel & Petri Ihartza, Maria Perez (1636)
Sarasti, Francisco & Intxausti, Maria Santuru (1670 b.l.)
Sarasti, Miguel (1670)
Agirre, Miguel (1700)
Agirre, Andres & Etxabe, Sebastiana (1736)
Agirre, Francisco Antonio & Roteta, Catalina Teresa (1763)
Ostolaza, Jose Antonio (1870)
Ostolaza, Francisco (1891 b.l.)
Ostolaza, Ana Maria (1891)
Geresta, Juan Bautista & Iguaran, Josefa Catalina (1894)
Geresta, Nazario & Maiz, Maria Mercedes (1913)
Geresta, Miguel Jose & Mujika, Lesmes (1975)
Geresta Aizpurua sendia; Geresta Azurmendi sendia


Joxin Azkue

Baserriaren ondoan dagoen bordaren xehetasuna (2004).


Joxin Azkue

Baserriaren alboko fatxada (2006).

# 14. Aretagoikoa

## Etimologia

Etimologikoki *are* eta *–eta* atzizki lokatiboez osatuta, bere homonimoaz bereizten da goikoa xedapen geografikoari esker. Dokumentazioan izen ezberdinekin ageri da: *Araneta de la parte de Asteasu* (1700); *Araeta de Suso* (1747) edo *Araeta Garaicoa* (1786).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Aretazpikoa baserritik gertu,
hegal erdiko zelaigune batean.




Koordenadak:
UTM: X: 575527; Y: 4784011; Z: 167
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 13.2″; Lat.: 43º 12′ 15.5″; Alt.: 167



Baserriaren fatxada nagusia berritu aurretik (1987).

## Deskribapena

Baserri barrokoa, XVII. mendeko bigarren erdian edo XVIII. mendeko lehen erdian eraikia, ataripedun egitura duten baserrien motakoa. Eraikinean interpretazio zaila duten eraikuntza-fase ezberdinak ikus daitezke. Oinplano angeluzuzena du eta kareztatutako harri-hormak eta harlanduzko lanak eskantzuetan eta baoetako markoetan, berrietan izan ezik.

Jatorrizko fatxada nagusia (hegoaldea) estalita aurkitzen da, ataripe moduan eginiko handitze bat dela eta. Ataripe hau handik gertu dagoen Aretazpikoa baserriak duenaren oso antzekoa da. Atarípe hau oso partzialki kontserbatzen da eta jatorrian beheko solairuaren zati handi bat hartzen zuela dirudi, atalondo zabal bat bezala irekita (mendebaldeko herena izan ezik), goiko itxiera egitura harlanduzko lanak dituzten pilare handi batzuetan sostengatuz. Berriki burutu diren berritzelanek jatorrizkoak ez diren pieza batzuk erabiltzen dituen egurrezko egitura berezi bat atera dute argitara. Ekialdeko eta iparraldeko fatxadak askoz hobeto kontserbatzen dira.



Baserriaren alboko fatxada (2005).

Eraikinaren barne egitura erabat berrituta dago eta guztiz desagertu dira jatorrizkoaren arrastoak.

## Historia

Aretagoikoa baserriaren lehen aipamena nahiko berantiarra da, XVII. mende bukaerakoa (1692), baina posible da lehenago ere eraikita egotea, 1391 urtean ospatu zen Zizurkil eta Tolosako hiribilduaren arteko auzotasun aktan parte hartu zuten bizilagunen artean Joan de Araneta eta Pedro de Araneta aurkitzen baitziren. Baserri hau udalerri honetako jatorrizko 20 oinetxeetako bat da, eta ondorioz, armarri heraldikoa edukitzeko eskubidea du.

Etxe honetako historian ez da garrantzia handiko daturik ezkutatzen, oinordetzaren banaketan izandako familia liskarrak kenduta. Ziurtasun dokumentalik ez egon arren, posible da eraikina II. Gerra Karlistaren testuinguruan kaltetua suertatzea (1871-1873), alboko basetxeekin gertatu zen bezalaxe.


Atariko pilareen bista barrualdetik (2009).

## Baserriaren jabeak:

Etxenagusia, Domingo & Etxabe, Maria (1692 b.l.)
Etxenagusia, Jose & Alkorta, Maria Ignacia (1692)
Etxenagusia, Alejandro & Etxeberria Otazu, Maria Luisa (1700)
Etxenagusia, Jose & Beldarrain, Salvadora (1746)
Etxenagusia, Juan Antonio & Arrastoa, Maria Josefa (1752)
Etxenagusia, Francisco Antonio (1790)
Etxenagusia, Jose Antonio (1855 b.l.)
Etxenagusia, Jose Domingo (1855)
Etxenagusia, Juan Bautista (1861)
Etxenagusia, Pedro Juan & Bengoetxea, Micaela (1905)
Etxenagusia, Pedro Angel & Tapia, Josefa Ramona (1936)
Etxenagusia, Jose Domingo & Miner, Sabina (1952)
Etxenagusia, Iñigo (2000)

# 15. Aretazpikoa

## Etimologia

Etimologikoki are eta *–eta* atzizki lokatiboez osatuta, bere homonimoaz bereizten da azpikoa xedapen geografikoari esker. Dokumentazioan izen ezberdinekin ageri da: *Araneta de Yuso* (1547); *Araneta de medio* (1611); *Araneta de la parte de Aduna* (1703); *Araeta de Yuso* (1752); *Araeta de alla* (1768) edo *Araeta Azpicoa* (1775).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Aretagoikoa baserritik gertu, hegal erdiko zelaigune batean.




Koordenadak:
UTM: X: 575560; Y: 4783984; Z: 166
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 11.7″; Lat.: 43º 12′ 14.7″; Alt.: 166

## Deskribapena

Baserri barrokoa, XVII. mendeko bigarren erdian eraikia, ataripedun egitura duten baserrien motakoa. Oinplano angeluzuzenarekin, bi etxebizitza independentetan banatuta dago, horma mehelin batez banatuta, bakoitza garapen ezberdinarekin.
Iparraldeko erdia da gehien aldatu dena eta kareztatutako eta bao apalak dituzten harri-hormak ditu. Sarrerako hormak puntu erdiko arkua du harlanduzko lanen imitaziozko plakatu batekin. Ekialdean estalpe moduko eraikin bat gaineratu da.
Hegoaldeko erdia, hobeto kontserbatuta dago eta bertako hormak *cara vista* modura aurkeztuta daude, eskantzuetan eta baoetan harlanduzko lanak ditu. Fatxada honetan eraikuntza-fase ezberdinak bereizi daitezke eta bere elementurik bereziena, ataripe modura egin zen handitze-lan berantiar bat (XVIII. mende hasiera) da. Bi sarrera ditu alboetan dobelatutako puntu erdiko arku forman eta beste sarrera bat dago hegoaldeko fatxadako ekialdeko ertzean. Hau partzialki kontserbatuta dago eta gaur egun sarrera itsua da. Ataripe hau, alboko Aretagoikoa baserriak jatorrian izan zuenaren antzekoa da, eta beheko partean harri-hormekin isten da. Erdialdean irekita dago argiztapen naturala laguntzeko, goiko itxiera harlanduzko lan finak dituzten bi pilareen gainean zurkaiztuta dago. Goiko itxierak izaera mistoa du egurrezko egiturarekin eta barnealdean kareztatutako adreilu sendoekin eta harlanduzko lanak dituzten eskantzuekin.


Bartolome Auzmendi
Baserriaren fatxada nagusia berritu aurretik (1974).

Eraikinaren barne egiturak erreforma handiak pairatu ditu eta ez da oso interesgarria, agian, 1873 urtean jasandako sute baten ondorioa da hau. Egitura solairu bakoitzeko frontalak zapatadun egurrezko zutiko multzo batez eutsita daude. Zutiko hauek teilatupean egurrezko espigadun txabeta bidez lotutako erdiko eta alboko astazaldien bidez lotzen dira.


Baserriaren hegoaldeko fatxada (2009).



Ataripearen barrualdea eta hegoaldeko jatorrizko fatxada (2009).



Teilatukopeko espigadun txabeta bidezko lotura (2009).

## Baserriaren jabeak:

Araneta, Magdalena & Etxenagusia, Martin (1600)
Etxenagusia, Martin (1643)
Etxenagusia, Joanes & Beldarrain, Isabel (1694 b.l.)
Etxenagusia, Domingo & Andiazabal, Maria Josefa & Olaskoaga, Antonia (1694)
Etxenagusia, Gabriel & Zaldua, Francisca Antonia (1733)
Etxenagusia, Bernardo & Añorga, Maria Ignacia & Atorrasagasti, Maria Ignacia (1765)
Etxenagusia, Manuel Antonio & San Millan, Juana Francisca (1811 b.l.)
Etxenagusia, Josefa Javiera & Mutiozabal, Jose Miguel (1811)
Mutiozabal, Antonio Maria eta Maria Leona (1840)
Mutiozabal, Jose Miguel (1848)
Mutiozabal, Maria Crispina & Barberia, Pedro (1863)
Barberia, Antonio Maria (1873)

**Iparraldeko ½**

Aranburu, Jose Antonio & Olaskoaga, Gabriela (1934)
Aranburu, Aniceto Iguacio (1972)
Aranburu, Maria Jesus & Lizarazu, Jesus (1981)
Lizarazu Aranburu sendia

**Hegoaldeko ½**

Olozaga, Migel Jose & Ormazabal, Juana (1934)
Olozaga Ormazabal sendia

## Historia

Aretazpikoa baserria XVI. mende erdialdean (1547) aipatzen da estreinakoz, baina posible da lehenago ere eraikita egotea, 1391 urtean ospatu zen Zizurkil eta Tolosako hiribilduaren arteko auzotasun aktan parte hartu zuten bizilagunen artean Joan de Araneta eta Pedro de Araneta aurkitzen baitziren. Baserri hau udalerri honetako jatorrizko 20 oinetxeetako bat da, eta ondorioz, armarri heraldikoa edukitzeko eskubidea du.

1733 urtean bere jabeek, Domingo Etxenagusia eta Antonia Olaskoagak, basetxe hau eta erantsita zegoen Legargainen gainean maiorazgo bat sortu zuten euren jabetzen segurtasuna bermatzeko, oinordeko bezala Gabriel Etxenagusia semea izendatu zen, bere ezkontza zela eta. Hori horrela izanda ere, Gabrielek auzitan jardun zuen bere arrebekin herentziaren banaketagatik eta bakoitzaren legitimaren esleipenagatik. Eta urte gutxi batzuen ondoren, herri bertako justiziak bere ondarea bahitu zuen familiak zituen zor kopuru handiari aurre egin ahal izateko (Aretazpikoa, Legargain, Nekola, Zalduzar eta Sarobe basetxeak). 1873an eraikinak kalte handiak izan zituen eremu horretan II. Gerra Karlista bitartean izandako istiluen ondorioz.

Etxea errentan jarri ohi zuten jabeek eta hala, 1759 urtean, Ignacio Mendigain kolonoak ondorengo urteko errenta ordaintzen zuen: 8 eta 2 zilarrezko errealeko 56 erreal, 20 gari anega, 16 arto anega, sagar-fruituak uzteko betebeharra maizterrek "beberaje"-rako behar zituztenak kenduta eta intxaur-, hur-, piku-, eta aran-fruituen erdia eta upeltegi, dolare eta atalondoaz erdibana gozatzea. Mende honen amaieran eraikina bitan banatuta zegoen eta alderdi bakoitza bere aldetik jartzen zen errentan, nahiz eta hauen tamaina ezberdina izan (1792 urtean Francisco Trekuk 112 dukat eta 2 kapoiko errenta ordaintzen zuen eta Jose Elolak berriz, 36 dukat eta 2 kapoikoa).

Zizurkilgo Udala



**Miguel Jose Olozaga eta Juana Ormazabal etxeko ataripean euren seme-alabekin: Miren, Jose, Patxi, Arantxa, Juanita eta Karmen (1943).**

Zizurkilgo Udala



**Jose Antonio, Luis, Manuela eta Patricio Aranburu anai-arrebak (1971).**

Zizurkilgo Udala



**Francisco Olozaga Gerra Karlistan lortutako dominekin (XX. mende hasieran).**

# 16. Argurutzea

## Etimologia

(*H)arr* (harria) eta *guruze* hitzez osatua. Eraikina Arguruzeaga izenarekin ere aipatzen da.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta dago.
Udaletxetik metro gutxira, hilerriko bidean.




Koordenadak:
UTM: X: 575381; Y: 4783430; Z: 116
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 19.9″; Lat.: 43º 11′ 56.8″; Alt.: 116



Baserria berritu aurretik (XX. mende erdialdea) udaletxeko eraikinaren alboan.

## Deskribapena

Gaur egun etxebizitza bloke moderno bat bihurtu da baserria. Beheko solairu bat eta hiru etxebizitza plantaz osatuta dago. Aurreko eraikinak oso diseinu sinplea zuen, eta solairu bat gutxiago. Euren artean itsatsita zeuden bi eraikin ezberdinez osatuta zegoen, mehelin horma batez banatuta: Arguruzeaga (Zaharra) etxe zaharra eta Arguruzeaga Txiki iparraldean.

## Historia

*Arguruceaga* eraikin zaharra, dokumentuetan XVI. mende amaieran aipatzen da, kontzejuak Martín Arangaizi alokatzen dionean (1577). Urte batzuk lehenago udal agintariek eraiki zuten Zizurkilgo Kontzejuak bere egitekoak garatzeko, artxiboak gordetzeko, pisuak edukitzeko, etabar. Hori baino lehen, bilerak bizilagunetakoren baten etxean egiten ziren edo elizako ataripean.

XVIII. mende hasieran Kontzejuak bere funtzioetarako egokiagoa zen eraikin bat eraikitzea adostuko zuen, aurrekoa kokatuta zegoen lekutik gertu eta ahalegin horren fruitua gaur egungo udaletxea izango da, 1708 eta 1713 artean eraikia. Une horretatik aurrera, jatorrizko eraikina Arguruzeaga Zaharra bezala ezagutu zen, administrazio funtzioetatik aldendu eta beste edozein etxebizitza-eraikin bezala alokatu zen.

Eraikina Jose Ignacio Etxeberriari saldu 1817an eta bere seme Miguel Antonio izan zen baratzeko zati baten gainean, eta jatorrizko eraikinari atxikita Arguruzea Txiki izeneko etxe berri bat altxako zuena 1830-1840 urteen inguruan.



Baserria azken erreforma egina (2004).



Argurutze eta Argurutzeatxiki baserria udaletxearen ondoan (1948).

## Baserriaren jabeak:

Udala (1577)
Etxeberria, Jose Ignacio (1817)
Etxeberria, Miguel Antonio & Oianarte, Casimira (1830)
Etxeberria, Pedro Miguel (1856)
Etxeberria, Manuela Josefa & Rekondo (1891)
Rekondo, Jose Mari eta Juan Jose; Arin, Maria Carmen (1929)
Rekondo, Isabel (1941)
Aranzabe, Jose Antonio (1959)
Kortajarena, Juan Cruz, Arruti, Manuel (1966)
Jabekideek

# 17. Arizkurutzeta

## Etimologia

*Aritz* eta *gurutze* hitzez eta –*eta* atzizki lokatiboaz osatuta. *Arricuceta* (1618); *Arizcuruçeta* (1541) edo *Arizguruzeta* (1835) izenekin ere ageri da.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Izen berbera daraman mendixka baten gainean, Adunako udalerritik gertu.

Koordenadak:
UTM: X: 575685; Y: 4786597; Z: 353
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 4.9′′; Lat.: 43º 13′ 39.3′′; Alt.: 353




Patxi Otegi

Baserriaren fatxada nagusia (1987).

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri neoklasikoa. Oinplano angeluzuzeneko eraikina, *cara vista* harri-hormekin eta harlanduzko lanekin eskantzuetan eta beheko solairuko baoetako batzuetan. Gainerako baoek diseinu oso antzekoa dute, egurrezko ateburuekin eta antzeko moduan banatuta aurkitzen dira. Beheko solairuan, ekialdeko fatxadan izan ezik, zenbait aireztapen gezileiho daude.
Barrualdeko egitura guztiz eraberrituta dago.

## Historia

Arizkurutzeta baserriaren historia ezagutzeko, gutxienez XVI. mendearen lehen erdialdera egin behar da atzera. Garai hartan, itxuraz, San Millan jaunak bere jabetzakoak ziren saroietan baserri berri batzuk altxa zituen, horien artean, Pagamendi, Ezkeltzu edo hemen aztertzen ari garena (1539). Gertaera honek Kontzejua eta San Millan sendiaren arteko auzia ekarri zuen eta horren ondorioz, eraikin berri horietako batzuk eraitsi egin ziren, herriko larreei kalte egiten zietela argudiatuta. Horren adibide argia da mende eta erdi beranduago antzeko arrazoiengatik ospatuko den auzi bat. Bertan, Arizkurutzetako saroi zaharreko haustarriaren kokapena aipatzen da (*"devajo de la escalera de la dicha casa entre el pie de la escalera y tavique de tablas y la quenta de la cavalleriza"* 1698). Hala ere, ez da hau gure egunetara iritsi den eraikina, baizik eta XIX. mende erdialdean eraiki zena. Zehazki 1849 urtean San Millan markesaren administratzailea zenak basetxe honen berreraikuntzarako proiektu bat aurkeztu zuen (*"que amenava proxima ruina …con desmonte ó derrivo de todo el edificio viejo"*), 9.200 errealen truke.
Basetxe honen jabeek alokairuan jarriko dute, kolonoek urteko errenta bezala ondokoa ordaindu zuten: 396 erreal, ahari bat eta 2 kapoi (1768). Zenbait urte beranduago, 1815ean, errenta honako hau zen: 22 gari anega, 220 erreal eta 2 kapoi.



Arizkurutzetako artzain saroia bere hasierako borobil itxura kontserbatzen duena (2008).

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Martin Ruiz & Gabiria, Margarita (1539)
San Millan, Martin Ruiz & Lasarte, Isabel (1554)
San Millan, Juan Ruiz & Ugarriaras, Maria Lopez (1548)
San Millan, Millian Ruiz & Okendo, Maria (1590)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Okendo, Miguel Carlos & Etxeberri, Antonia Maria (1681)
Okendo, Micaela & Agirre, Jose (1693)
Agirre, Jose Antonio & Jauregi, Ana & Sarria, Fausta & Altzaga, Maria Ines (1701)
Agirre, Jose Francisco & Porcel, Maria Teresa (1720)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1744)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Beraza, Jose & Zalakain, Prudencia (1941)
Beraza, Rosario & Etxeberria, Maria Josefa (1955)
Otegi, Miguel & Jauregi, Juana Maria (1974)
Otegi, Miguel & Jauregi, Juana Maria; Aburuza, Miguel Maria; Aburuza, Jesus Maria (1914)
Lizarza, Juan Pablo (1996)

# 18. Arizmendi

## Etimologia

*Aritz* eta *mendi* hitzez osatua. Dokumentalki Harezmendi (1391) edo Areizmendi (1596) izenekin ere ageri da.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Herrigunea menderatzen duen muino txiki baten gainean.



Koordenadak:
UTM: X: 574837; Y: 4784217; Z: 165
Geografikoak: Luz: -2º 4′ 43.7′′; Lat.: 43º 12′ 22.5′′; Alt.: 165


Fatxada nagusia (2008).

## Deskribapena

XX. mendean (1975) guztiz berritua izan zen baserria. Oinplanta angeluzuzena duen eraikina da eta bere jatorrizko hormak kareztatutako material modernoekin estali ziren. Bertan ikusi daitezkeen dekorazio motibo guztiak (harlanduzko lanak baoetan edo eskantzuetan, hastialaren itxitura, egurrezko egitura, eta abar.) ez dira jatorrizkoak. Eraikinaren barnealdea ere erabat berritua izan da eta ez du jatorrizko eraikinaren aztarnarik mantentzen.


Joxin Azkue

Baserriaren kokalekua (2004).

## Historia

Arizmendi baserria 1590 urtean aipatzen da estreinakoz, nahiz eta 1391 urtean ospatu zen Zizurkil eta Tolosako hiribilduaren arteko auzotasun aktan parte hartu zuten bizilagunen artean Martin de Harezmendi izeneko bizilagun bat aurkitzen zen, hortaz, pentsatzekoa da eraikina agian dagoeneko altxata zegoela. Baserri hau udalerri honetako jatorrizko 20 oinetxeetako bat da, eta ondorioz, armarri heraldikoa edukitzeko eskubidea du.

Basetxe honen garapenean ez da gertaera garrantzitsurik egon. Dokumentatuta dauden obra bakarrak 1764 urtekoak dira. Etxea eta berari atxikitako borda herri bertako Justiziak zorrengatik bahitu eta bi hamarkada beranduago, Francisco Ignacio Leturiondo azpeitiarrari salduko zaio eta honek burutuko du erreforma partziala.

Aurreko jabeak, Pedro Etxabek, Domingo Imazi alokatu zion etxea 1743 urtean ondorengo errentaren truke: 11 dukat, 8 erreal eta 8 gari anega.

## Baserriaren jabeak:

Arizmendi, Ascensio (1590)
Arritxipia, Ana (1596 b.l.)
Arizmendi, Maria Perez & Etxabe, Joanes (1596)
Arizmendi, Maria Juan (1622)
Etxabe Arizmendi, Pedro & Etxeberria, Maria Ascension (1670)
Etxabe Irazu, Juan & Larraondo, Maria (1710)
Etxabe Arizmendi, Pedro (1724)
Etxabe, Juan Ignacio; Maria Clara; Teresa; Pedro (1758)
Lizarraga, Francisco & Garagorri, Ana Maria; Etxabe, Domingo (1764 b.l.)
Leturiondo, Francisco Ignacio & Lamariano, Melchora Ignacia (1764)
Leturiondo, Antonio & Olaeta, Maria Concepcion (1775)
Leturiondo, Jose Maria & Berroeta, Josefa Joaquina (1806)
Leturiondo, Jose Jeronimo & Iturriaga, Maria Bernarda (1832)
Leturiondo, Maria Bernarda & Arribillaga, Jose Antonio (1845)
Arribillaga, Josefa Jeronima & Zelaia, Victoriano (1911)
Barriola, Gaspar (1913)
Barriola, Gregorio (1914)
Alberdi, Juan Pablo & Mendiguren, Maria Antonia (1922)
Mendizabal, Jose Maria & Alberdi, Maria Filomena (1924)
Alberdi, Gabriel Maria & Alkilazate, Juliana & Zurutuza, Maria Mercedes (1930)
Saizar Irazusta sendia

# 19. Arizmendizabal

## Etimologia

Izena bere eraikitzailearen abizenetik dator, Juan Pedro Arizmendi. *Arizmendi la nueva* (1859) bezala ere aipatzen da.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago.
Bailararen atzean, Villabonatik Asteasura doan errepidearen alboan, industrialdea inguratuz.



Koordenadak:
UTM: X: 576191; Y: 4782681; Z: 61
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 44.4″; Lat.: 43º 11′ 32.2″; Alt.: 61


Patxi Otegi

Baserria berritu aurretik (1987).

## Historia

Baserria 1843 urtean eraiki zuen Juan Pedro Arizmendik Ihartzako maiorazgoko ("Beldarraingo barrutia" izenaz ezagutua: *"la casa nombrada Arizmendi-zabal que acaba de construir, y que radica en la inmediación del molino titulado Aquezcoa"*) jabetzakoa zen zelai batean. 1869an baserriak beheko solairuan, ikuilua eta atalondoa zituen. Lehenengo solairuan etxebizitza dolarea eta ganbara zituen.

1928an Miguel Leundak bi etxebizitzetan banatu zuen eraikina, bat bere seme-alaba bakoitzarentzat, horma mehelin batez banatuta. Iparraldeko erdia 1954an eraitsi zen eta berreraiki egin zen.


Patxi Otegi

Baserria berritu aurretik (1987).

## Deskribapena

XIX. mendeko baserri neoklasikoa. Zarpiatutako harri-hormak dituen oinplanta angeluzuzena duen eraikina, eskantzuetan eta hegoaldeko sarrerako etxaurrean harlanduzko lanekin hornitua. Jatorrizko baoek adreiluzko markoa izan zutela apreziatzen da kareztatutako zatiak altxatuta dauden tokietan. Beranduago bao berriak ireki dira eta beste batzuk itxi. Gaur egun ez da inor bizi bertan, baina teilatua duela gutxi berritu da.


Joxin Azkue

Hegoaldeko fatxada (2005).

## Baserriaren jabeak:

Arizmendi, Juan Pedro & Barriola, Maria Salvadora (1844)
Gaiztarro, Juan Jose & Ezeiza, Antonia Juana (1877)
Gaiztarro, Juan Jose (1879)
Gaiztarro, Antonio Maria & Galarraga, Juana (1885)
Gaiztarro, Petra & Arana, Jose Martin (1905)
Elizegi, Jose Maria (1913)
Saizar, Julio Martin (1913)
"Portu Hermanos y Cia." (1922 b.l.)
Leunda, Miguel & Zubeldia, Maria (1922)

**Iparraldeko ½**
Leunda, María Antonia & Leunda, Jose Antonio (1954)
Leunda, Maria Blanca, Maria Milagros eta Maria Carmen (1956)

**Hegoaldeko ½ (Agirre Goikoa)**
Leunda, Martin & Dorronsoro, Maria (1954)
Leunda, Maria Carmen & Jauregi, Jesus

## Etimologia

(*H)arri* eta *–eta* atzizki lokatiboaz osatuta, hau da, harri askoko eremua.

## Kokapena

Mendibailaran kokatua dago.
San Miguel ermitatik gertu dagoen
zabaldi baten gainean.



Koordenadak:
UTM: X: 575771; Y: 4783700; Z: 111
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 2.5′′; Lat.: 43º 12′ 5.4′′; Alt.: 111

## Deskribapena

XX. mendean berritutako baserria da eta gaur egun bizileku funtzioa du. Oso eraikin sinplea da, oinplano angeluzuzena du eta eraikin zati berriak gehitzen joan zaizkio (ekialdean eta iparraldean).
Barrualdean nahiz kanpoaldean burututako berrikuntzek jatorrizko eraikinaren arrasto guztiak desagertarazi dituzte. Hego-ekialdeko fatxadan harlanduzko lanak dituzten eskantzuak daudela soilik azpimarratu daiteke.



Fatxada nagusia (2009).

## Historia

1470 urtean San Millan jauna Tolosako hiribilduko jurisdikzioko auzotasunari ekingo dio, bere jabetzen artean *"Harrieta"* basetxea aipatuko duela. 1691 urtean Mariana Iraragorrik dote bezala etxearen jabetza jaso zuen bere gurasoen aldetik (Joanes Etxeberria Iraragorri eta Isabela Agirre) Juan Etxenagusiarekin ezkontzeko. Azken honek diru kopuru garrantzitsu bat eman zuen Arrieta etxean hargintza lanak egin ahal izateko (*"hacer con ellos obras de canteria en la dicha casa de Arrieta de que necesita"*). Ezkonberriek maiorazgo berri baten barruan sartu zituzten euren jabetza guztiak (Olatza oinetxea, Arrieta eta Egieta, eraikuntza berriena).
1791 urtean etxearen jabeak, Manuel Martin Larrondobunok, auzi luze bat izan zuen San Millan markesaren administratzailearekin bakoitzaren jabetzen mugen inguruan. Aitortutakoaren arabera, Arrieta jatorrian markesaren jabetzakoak ziren baina enfiteusi-zentsu gisa (urtean oilo bateko errenta) emandako lurretan eraikia izan zen. Hau guztia eremuko plano sinple batean islatuta geratu zen.



Arrieta baserria 1968 inguruan.

Zizurkilgo Udala




ARCHV. PD 503-01

1791ko planoa San Millan Jauntxoaren jabetasun mugekin.



Zizurkilgo Udala

**Juli Arrastoa bere alaba Arantxa Arruti besoetan hartuta (1932).**



Zizurkilgo Udala

**Arantxa Arruti eta Paulino Izagirre Mari Juli alabarekin baserriaren aurrealdean (1962).**




Jose Maria Arruti eta Juli Arrastoa Arantzazura eginiko bisita batean seme-alabekin: Karmen, Jose Ignacio eta Arantxa (1943).

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Martin Ruiz & Berrasoeta, Juana & San Millan, Juana Ruiz (1470)
Añorga, Ascensio & Altziturri, Magdalena (1665)
Etxeberria Irarragorri, Joanes & Agirre, Isabel (1670)
Irarragorri, Mariana & Etxenagusia, Juan (1691)
Etxenagusia, Isabel & Martin Larrondobuno (1710 b.l.)
Larrondobuno, Juan Martin & Gandarias, Maria Ignacia (1717)
Larrondobuno, Martin Manuel & Furundarena, Maria Josefa (1775)
Larrondobuno, Jose Antonio (1830)
Larrondobuno, Manuel Bernardo & Rekondo, Francisca Antonia (1847 b.l.)
Larrondobuno, Jose Antonio & Arbildi, Ramona (1847)
Muñagorri, Jose Miguel (1854)
Muñagorri, Jose Francisco & Larrunbide, Juana Francisca (1857)
Muñoa, Marcos Antonio & Pagadizabal, Manuela
Muñoa, Juan Cipriano eta Miguel (1880)
Muñoa, Marcos (1949)
Banco Popular (1957 b.l.)
Izagirre, Paulino & Arruti, Maria Arantzazu (1957)
Izagirre Arruti sendia

## Etimologia

(*H)arri* eta *txipi* (txikia) hitzen loturatik sortua. Bere izenak ia ez du aldaketarik jasan: *Arrichipia* (1595).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. San Miguel ermitatik metro gutxira aurkitzen den zabaldi batean.



Koordenadak:
UTM: X: 575788; Y: 4783781; Z: 117
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 1.7′′; Lat.: 43º 12′ 8′′; Alt.: 117

## Deskribapena

Oso diseinu sinplea duen XIX. mendeko eraikina da eta duela gutxi berritua izan da. Oinplano angeluzuzena duen eraikina da, kareztatutako harri-hormekin eta eskantzuetan harlanduzko lanekin. Baoek antzeko diseinua dute, fatxada guztietan simetrikoki banatuta aurkitzen dira. Azken berrikuntzen ondorioz, margotutako egurrezko ateburuak gaineratu zaizkio. Hastialaren itxiera ere erreformatu egin da eta estalkia ere erabat berritu da. Fatxada nagusiko horman sartuta harrizko gurutze bat dago, nahiko hondatuta dago eta ziurrenik, bere jatorria, handik gertu dagoen San Miguel ermita da eta XIX. mende amaieran eginiko berreraikuntza dela eta ipini zen toki horretan.

Baserriaren ondoan solairu bakarreko txabola txiki bat dago eraikita, kareztatutako harri-hormak eta harlanduzko lanak dituen eskantzuak ditu eta aurrealdean, atari moduko bat du. 1864an txabola hau *Sutegui chiquia* izenaz ezagutzen den teilape bat bezala izendatzen da, agian jatorrian, sutegi edo antzeko funtzioetarako erabili zelako.

Eraikinaren barnealdea ere oso sinplea eta antzekoa da. Tarteko solairuen habe frontalen eta teilatupeko habe petralen pisua eusten duten zutikoez eta zapatez osatuta dago. Teilatupeko habeen kasuan, zubi-habeak edo astazaldiak erabiltzen dira zutikoak euren artean lotzeko "miru-buztana" moduan. Horietako batzuk burdinezko zingilak erabiliz sendotuta daude.


Patxi Otegi

**Baserria berritu aurretik (1987).**


Joxin Azkue

**Baserriaren ondoko borda (2004).**



**Estalkiaren egitura zutikoekin. Hemendik abiatzen dira astazaldi ezberdinak (2008).**

## Historia

Arritxipi baserriari buruzko datuak ezagutzeko XVI. mende amaierara (1596) egin behar da atzera, nahiz eta posible den eraikin hau mende horretako bigarren erdian dagoeneko altxata egotea.



**Fatxada nagusiko gurutzearen xehetasuna (2010).**

Eraikin honen historian ez dago gertaera garrantzitsurik, gorabehera eta familia gatazka handirik gabe igaroko baita. Aipagarriena II Gerra karlistan (1871-1875) zehar jasan zuen sutea da. Horren ondorioz guztiz berreraiki behar izan zen, eremuko beste baserri askorekin gertatu zen bezala.

Zizurkilgo Udala



**Otegi familia bordaren parean, bazkalondoan (1936).**

Zizurkilgo Udala



**Arritxipi baserria 1968 urte inguruan.**

Zizurkilgo Udala



**Jose Mari Otegi eta Josefina Tapia seme-alabekin: Manuel, Josetxo eta Rosa (1975).**

Zizurkilgo Udala



**Josetxo, Iñaxi, Patxi eta Jone Otegi anai-arrebak baserriaren aurrean (1955).**



Zizurkilgo Udala

Jose Mari Otegi eta Josefina Tapiaren ezkontza (1948).

## Baserriaren jabeak:

Arritxipia, Ana (1595)
Arizmendi, Maria Perez & Etxeberria, Joanes (1623)
Alziturri, Magdalena & Añorga, Ascensio (1665)
Añorga, Mariana & Zaldua Arritxipi, Joanes (1693)
Zaldua, Millan (1722)
Zaldua, Francisco & Zirauki, Luisa (1733)
Zaldua, Maria Joaquina & Gandarias, Ignacio (1743)
Zaldua, María Josefa & Zarauz, Mateo (1764)
Zarauz, Ignacio & Etxabe, Catalina Antonia (1791)
Zarauz, Jose Francisco & Lejaristi, Maria Concepcion (1840)
Zarauz, Juana Antonia & Urkia, Antonio (1864)
Otegi, Andres & Urkia, Agustina (1888)
Otegi, Jose Lucio & Mendizabal, Juana (1918)
Otegi, Jose Maria & Tapia, Josefa (1948)
Otegi Tapia sendia

# 22. Artutxaenea

## Etimologia

Izena baserriaren eraikitzailearen abizenetik dator Jose Andres Artutxa: “Artutxaren etxea”. Etxea *Estankoa* bezela ere ezagutzen da.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean
kokatuta dago, plazatik gertu.




Koordenadak:
UTM: X: 575339; Y: 4783511; Z: 114
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 21.7″; Lat.: 43º 11′ 59.4″; Alt.: 114

## Deskribapena

Baserri edo hiri-etxea, harri-hormekin eta egurrezko egiturarekin. Oinplano karratua du, *cara vista* hormekin eta harlanduzko lanak dituzten eskantzuekin. Beheko solairuko bao guztiek harlanduzko markoa dute, atzealdeko fatxadakoek izan ezik. Han adreiluzko ateburua dute, lehenengo solairuko baoek bezalaxe. Barrualdea erabat berrituta dago.

## Historia

Etxea 1829 urtean eraiki zen handik gertu zegoen Plazaetxeberri etxearen jabetzakoa zen baratza zati batean. Jose Andres Artutxa presbiteroak erosi zuen bertan bere erosotasunerako etxe bat eraikitzeko (*"intenta construir una casa á su comodidad"*). 1870 urtean eraikinak sotoa, beheko solairua, beste solairu bat eta ganbara zituen.



Zizurkilgo Udala

**Jose Kortajarena (1940).**



**Baserriaren atzealdeko fatxada (2010).**



Zizurkilgo Udala

**Pedro Mari Kortajarena (bizarduna) lagun batzuekin Corpus egunean (1977).**

### Baserriaren jabeak:

Artutxa, Jose Andres (1829)
Artutxa, Jose Manuel & Zubimendi, Maria Manuela (1849)
Artutxa, Juan Miguel & Soroa, Juana Josefa (1854)
Alkilazate, Hilario (1878)
Alkilazate, Francisco Jose; Mimendi, Jose Ramon eta Isabel; Ezeiza, Domingo eta Juan Jose (1896)
Treku, Catalina (1897)
Gurrutxaga, Juan Francisco & Ibarbia, Manuela Antonia (1900)
Kortajarena Lasaga sendia; Campos Martin sendia

# 23. Astabere

## Etimologia

*Asta* (lahardi) eta *aurre* hitzez osatua. Jatorrian Beldarrain etxea bezala ezagutzen zen bere eraikitzaileari (Joanes Beldarrain) erreferentzia eginez eta aurrerago *Astaure* (1664) edo *Astaurre* (1703) izena edukitzera pasa zen, gaur egun duen izena edukitzera iritsi arte.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Legargain muinoko erdi
hegaleko zabalune batean kokatuta.



Koordenadak:
UTM: X: 575318; Y: 4784687; Z: 153
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 22.1″; Lat.: 43º 12′ 37.5″; Alt.: 153

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri neoklasikoa, azken urtetan berrikuntza asko izan ditu. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eta atal berriak atxikitzen joan zaizkio. Bere kanpoko egitura oso aldatuta dago, beheko solairuan plakatu bat, baoetan ateburu faltsuak, eta abar daude.

Barrualdean ikus daitezke jatorrizko eraikinaren arrasto bakarrak. Egurrezko egitura du eta zapatadun zutikoek habe frontalen pisua eusten dute beheko pisuetan eta habe petralena teilatupean. Azken honetan garai hartan erabili ohi ziren muntaiak ikus daitezke ("miru-buztana" modukoak edo kaxa modukoak) nahiz eta apur bat testuingurutik kanpo egon, estalkia goratu egin baita.

## Historia

Astabere baserriaren jatorria XVII. mendeko lehen hamarkadetan topatzen dugu, Joanes Beldarrain jabetza ezberdinen jabea dela aipatzen denean, horien artean, *"la casa nueva de Beldarrain alias Astaure"* (1632). Eraikin honi buruzko erreferentziak erabat desagertzen dira XIX. mendeko determinatu gabeko momenturen batean bere jabeek erabat berritzen dutenean, eta berrikuntza gehiago burutu ziren duela 30 bat urte, gaur egun duen itxura lortu arte.


Zizurkilgo Udala

**Josepa Tapia (1943).**


Zizurkilgo Udala

**Jose Ibarbia (1938).**


Zizurkilgo Udala

**Toribia Lertxundi eta Juan Manuel Azpirozen ezkontza eguna (1929). Baserriko maizterrak.**


Patxi Otaegi

**Baserriaren kokalekua (1987).**



**Estalkiaren egitura (2009).**

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Joanes (1632)
Arizmendi Andia, Joanes (1664)
Andiazabal, Martin (1688)
Andiazabal, Catalina & Irazu, Juan Bautista (1712)
Irazu, Joaquin & Etxabeguren, Maria Ramos (1762)
Irazu, Juan Bautista & Zelaia, Josefa Antonia (1782)
Irazu, Jose Joaquin & Alkorta, Ana Josefa (1806)
Irazu, Jose Antonio (1841)
Marmol, Jose Rafael & Goikoetxea, Jesusa (1854)
Marmol, Pedro & Serrano, Rufina (1886)
Marmol, Paulino & Tapia, Juana Josefa (1910)
Ibarbia, Antonio Maria (1921)
Ibarbia, Jose Francisco (1936)
Aranburu Irurtia sendia (1986)
Irurtia, Josetxo (1998)
Alzugarai, Iñigo

## Etimologia

Atxulondo baserriaren etimologia ez dago argi. Dokumentazioan modu ezberdinetara izendatzen da: *Achulondo* (1470); *Arsulondo* (1527); *Asulondo* (1710) edo *Azulondo* (1857).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago, Andoaingo mugatik gertu. Eremu hau Atxulondoko Interes Naturaleko Eremuaren baitan kokatuta aurkitzen da.

Koordenadak:
UTM: X: 576773; Y: 4787817; Z: 152
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 16.1″; Lat.: 43º 14′ 18.4″; Alt.: 152



## Deskribapena

Jatorrian ekoizpen gune zentro garrantzitsu bat (burdinola, errota, basetxea) osatzen zuten eraikin multzo bat zen. Gaur egun erortzeko zorian daude eta landaretzak estalita daudenez, zaila da eraikin hauen ezaugarriak determinatzea. Eraikinen artean antzinako burdinolaren arrastoak identifikatu daitezke, *cara vista* harri-hormak eta harlanduzko eskantzuekin. Burdinola honetatik tailerra eta ikaztegiaren zati bat kontserbatu dira, eta aldiz, guztiz desagertu da anteparako eremua eta hornikuntza kanalen zati bat. Horma horietan bi tarte bereizten dira, erdizirkularrak eta dobelatuak, gurpil hidraulikoak hauspoarekin eta mailuarekin lotzen dituzten ardatzentzako erabiliak. Multzo honek, jatorrian, tamaina handiko bi presa izan zituen Saratxoetako erreka eta Leraberroko errekan, bertan zeuden aparailu ezberdinak elikatzeko. Hauek oso partzialki mantentzen dira eta azken uholdeen ondorioz oso kaltetuta daude. Presa hauek ur-emaria erregulazio urtegi batera bideratzen dute, harlanduz eginikoa, eta hau ere partzialki kontserbatzen da. Burdinolatik gertu, antzinan olagizonaren etxea izan zenaren eta aurrerago basetxe baten bihurtu zen arrastoak daude. Burdinolaren antzera egina dago, oso kaltetuta eta landaretzak estalita dauden *cara vista* harri-hormekin. Ezin izan dira errota zaharrarekin lotutako egiturak lokalizatu, baina eremu horretan dagoen landaretza sakona dela eta, ezin da segurtasunez zehaztu.


© Julian Arrastoa

**Burdinolako presatako bat (2003).**

## Historia

Atxulondoko multzoa Gipuzkoako lurraldeko azpimarragarrienetako bat da. Bere kokaleku konplexuari esker mantendu da, baina abandonu egoeran dago eta horrek bere kontserbazioa mehatxatzen du. Multzo honen existentzia baieztatzen duten daturik zaharrenak XV. mendekoak (1470) dira, Gaztelako Enrique IV erregeak Garcia Arevalok eskubide batzuengatik jasotzen dituen kobrantzak Juan Abendañori eman zizkiolako, hortaz, momentu horretarako martxan zegoen. Burdinola Zizurkilgo Kontzejuak berak eraiki zuen eta bere jabetzakoa izan zen XIX. mende hasierara arte. Ondoren beste udal jabetza batzuekin batera besterendua izan zen gatazka napoleonikoak eragindako zerga eta kargei aurre egin ahal izateko. 1810 urtean Manuel Jose Larrondobunori saldu zitzaion eta gero partikular ezberdinen eskuetatik pasa zen.

Kontzejuak aldizka errentan jartzen zuen burdinola eta errota (XVI. mende amaieratik gutxienez). Dirudienez bi elementuok erabili gabe daude XVIII. mendeko azken hamarkadetan eta basetxe bihurtutako olagizonaren etxe zaharra bakarrik geratzen zen. Historian zehar multzo osoan eginiko berrikuntza eta konponketen zerrenda oso luzea da eta horien artean garrantzitsuenak XVI. mendearen amaieran (1560-1570 inguruan) eta XVIII. mendearen hasieran (1734) eginikoak dira. Gaur egun kontserbatzen diren egitura gehienak garai hartakoak dira.


GAO. COLCI-2297

1784an burdinolaren aldaparoetan egindako berrikuntzaren planoa.

## Baserriaren jabeak:

Udala (1470)
Tejeria, Jose Antonio (1810)
Larrondobuno, Manuel Jose (1810)
Larrondobuno, Juan Ignacio (1825 b.l.)
Lizarraga, Joaquin; Leiaristi, Juan Bautista; Etxabe, Jose Ignacio; Atxega, Domingo Ignacio; Etxeberria, Asensio; San Millan, Ignacio Maria eta San Millan, Francisca (1825)
San Millan, Ignacio Maria (1830)
8 auzokide (1857)
Zabala, Jose Luis & Arizmendi, Maria Andresa (1861)
Agirre-Miramon, Severino (1904 b.l.)
Atorrasagasti, Balbino & Mujika, Isabel (1904)
Atorrasagasti, Felipe eta Jose Antonio (1912)
Irazusta, Carlos & Berroeta, Prudencia (1930)
Sociedad Papelera Española, S.A. (1957)
Gipuzkoako Foru Aldundia

# 25. Aundia

## Etimologia

*Andia* terminoaren bilakaera, erreferentziarik zaharrenetan aipatzen den bezala. XVII. mende amaieratik aurrera *Andia la antigua* bezala izendatzen da zenbaitetan, orduan eraikia izan zen Aundiberri etxeaz bereizteko.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Izen bereko muinotik gertu kokatuta dagoen ikuspen handiko zelaigune batean.



Koordenadak:
UTM: X: 575167; Y: 4784036; Z: 151
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 29.1″; Lat.: 43º 12′ 16.5″; Alt.: 151



Baserriaren atzealdeko fatxada (2008).



Joxin Azkue

Baserriaren fatxada nagusia (2005).



Joxin Azkue

Fatxada nagusiko bao geminatua (2005).

## Deskribapena

Baserri gotiko-errenazentista, baserri-dolare motakoa, XVI. mendean edo XVII. mendearen erdian eraikia. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, harri-hormekin eta harlanduzko lanekin eskantzuetan eta jatorrizko baoen markoetan. Eraikina bi etxebizitza independenteetan banatuta dago eta bakoitzak garapen ezberdina izan du.

Jatorrizko baserriaren azalera gaur egun duena baino txikiagoa zen, hegoalderantz handitu zen (XX. mende hasieran) eta estalkia erabat berritu zen. Argi ikusten da jatorrizko eraikinaren mugak markatzen zituzten hego-ekialdeko eta ipar-mendebaldeko fatxadetako harlanduzko eskantzuen arrastoen bidez eta handitze-hor-

marentzat eraiki ziren errefortzuen bidez. Une horretan bertan berrituko da hastiala ere gaur egun duen adreilu eta egurrezko itxiera emango zaiolarik. Duela ez horrenbeste, bao berriak ireki dira iparraldeko erdian eta terraza bat gehitu zaio betetzen dituen ostalaritzako funtzio berrietara egokitzeko. Gaur egungo eraikinean jatorrizko eraikinaren arrastoak daude, esate baterako, ipar-mendebaldeko gezileihoak eta hego-ekialdeko geminatutako baoak.
Eraikineko barne-egiturak aldaketa handiak jasan ditu eta ia ez dago jatorrizkoaren arrastorik. Hauek berrerabilita daude, jatorrizko kokalekutik kanpo, eraikinaren egitura osatuko luketen "enara-buztana" moduko muntaien arrastoak dituen osoko pilare batekin eta antzinako sagardo dolareko bi berniekin gertatzen den bezala. Gaur egun, bere egitura, habe frontalak eusten dituzten zapatadun zutikoez osatuta dago. Zutiko hauek, beheko solairuan, pilareharriek eusten dituzte.



**Berrerabiliak izan diren sagardo dolare zaharreko berniak (2008).**

## Historia

Aundia baserria XVI. mendearen erdialdean (1562) ageri da estreinakoz dokumentazioan, nahiz eta 1391 urtean Pero d'Andia eta Beltran d'Andia abizeneko bizilagun batzuk zeuden ziurtasuna dagoen. Pertsona hauek 1391 urtean ospatu zen Zizurkil eta Tolosako hiribilduaren arteko auzotasun aktan parte hartu zuten bizilagunen artean zeuden. Baserri hau udalerri honetako jatorrizko 21 oinetxeetako bat da, eta ondorioz, armarri heraldikoa edukitzeko eskubidea du. Baserriaren jabeek errentan jarri zuten etekin hobeak lortzeko eta horrela, 1708 urtean Ignacio Txokarro

Zizurkilgo Udala



**Jose Joaquin Arregi eta Francisca Eizmendi baserriaren ondoan (1960).**

Zizurkilgo Udala



**Jose Manuel eta Jose Joaquin Arregi, Magdalena Arregirekin baserriaren aurrean (1963).**

Zizurkilgo Udala



**Jose Manuel Arregi eta Juanita Goenagaren ezkontza (1951).**

kolonoak hauxe ordaintzen zuen urteko errenta bezala: 8ko zilarrezko 34 erreal, 14 gari anega, 17 arto anega, sagarraren fruituaren erdia eta lihozko 3 lakariren landaketa. 1835 urtean errenta ondokoa zen: 330 erreal eta 28 gari anega. 1863an baserriak atalondodun beheko solairuan, ukuilua, bi sukalde eta bi gela zituen. Lehenengo solairuan 3 gela, 6 logela eta aleentzako bi gela eta ganbara bat zituen. 1908 urtean bi etxebizitzatan banatu zen horma mehelin baten bidez.



Zizurkilgo Udala

Festetako Oilo biltze eguna baserri aurrean (1975).



Zizurkilgo Udala

Gipuzkoako Bertsolari Gazteen Txapelketa, Joaquin Arregik irabazia (1969).

## Baserriaren jabeak:

Andia, Maria Martin & Beldarrain, Joanes (1562)
Beldarrain, Jose & Andiazabal, Maria Ignacia (1703)
Beldarrain, Martin Jose & Beldarrain, Catalina (1717)
Beldarrain, Maria Josefa & Andiazabal, Juan Martinez (1750)
Zabala, Pedro (1750)
Zabala, Jose Maria (1835)
Zabala, Jose (1860 b.l.)
Zabala, Juan Jose (1860)
Zabala, Juan Jose (1882)
Franconi, Eusebia (1896)

**Iparraldeko ½**

Atxaga, Jose Jacinto & Albisu, Maria Luisa (1908)
Atxaga, Maria Demetria & Otegi, Jose (1923)
Arregi, Jose Manuel & Goenaga, Juana (1985)
Arregi Lertxundi sendia

**Hegoaldeko ½**

Barriola, Juan Jose & Begiriztain, Josefa Luisa (1908)
Barriola, Maria Nieves
Barriola, Juana Juliana & Aranburu, Ignacio
Aranburu, Fermin eta Sabina (1999)

# 26. Aundiberri

## Etimologia

*Andia* eta *berria* hitzek osatuta, Aundia baserriari erreferentzia eginez. Dokumentazioan *Andiaberria* edo *Andia la nueva* bezala ageri da.

Joxin Azkue

**Baserriaren kokapenaren ikuspegia (2005).**

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta zegoen.
Aundia eta Arandabarro baserrien arteako hegal erdian kokatuta.




Koordenadak:
UTM: X: 575043; Y: 4784182; Z: 166
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 34.5″; Lat.: 43º 12′ 21.2″; Alt.: 166



Baserri zaharraren hormen arrastoak (2005).

## Deskribapena

Baserria gaur egun erabat desagertuta dago eta bere kokalekua gutxi gorabehera ezagutzen da. Duela urte gutxi arte (2005) bere hormatalen zati bat ikusi zitekeen, baina ezinezkoa da bere ezaugarriak zehaztea.

## Historia

Baserria estreinakoz XVII. mendean aipatzen da, 1665 urtean, eta eraikuntza data ez da ezagutzen. Eraikin hau Aundia basetxeari atxikitako edo haren gehigarria zen eraikin bat bezala definitzen da, eta hortaz, bertako jabeek eraikia izan zen.

Aundiberrik oso eraikin sinplea zuela aurrikusi daiteke. 1863 urtean deskribatzen denaren arabera, ondoko egitura zuen: beheko solairua (atalondoa, sukaldea eta ikuilua), solairu nagusia (aletegia eta ganbara) eta bigarren solairua (ganbara).



Baserri zaharreko eskantzuetako baten xehetasuna (2005).



Baserriaren kokalekua erakusten duen airetik hartutako argazkia (1954).

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Jose & Andiazabal, Maria Ignacia (1715)
Beldarrain, Martin Jose & Beldarrain, Catalina (1717)
Beldarrain, Maria Josefa & Andiazabal, Juan Martinez (1750)
Lertxundi, Jose (1778 b.l.)
Zabala, Juan Bautista (1778)
Zabala, Jose Maria eta Maria Josefa (1822 b.l.)
Lasa, Pedro Ignacio (1822)
Lasa, Gertrudis & Eizagirre, Francisco (1858 b.l.)
Eizagirre, Manuela Clementina & Madina, Fausto (1858)
Madina, Ramon Francisco, Juan Manuel eta Jose Maria (1901 b.l.)
Sorarrain, Pedro Ignacio & Alkorta, Manuela Josefa (1901)
Sorarrain, Crispin & Amunarriz, Hermenegilda (1917)
Mendizabal, Antonio & Mendizabal, Ines (1929)
Mendizabal, Juana eta Salvadora (1976)
Imaz, Maria Pilar
Otegi Tapia sendia

# 27. Aundizabal

## Etimologia

Bere izena andia eta zabal hitzen konbinaziotik sortu da. Dokumentuetan antzinako formulazioa erabiliz ageri da: *Andiazabal*.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Aretagoikoa eta Aretazpikoa baserrietatik gertu, erdi hegoan dagoen zelaigune batean.



Koordenadak:
UTM: X: 575663; Y: 4784058; Z: 169
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 7.1″; Lat.: 43º 12′ 17″; Alt.: 169


Baserriaren kokalekua (1974).

Bartolome Auzmendi

## Deskribapena

Duela gutxi berritua izan da baserria (2009). Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, material modernoekin egina eta bere jatorrizko egitura eta funtzioa erabat aldatu dira, bai kanpotik bai barrutik. Antzinako argazkiek eraikin sinplea eta erregularra erakusten dute. Kareztatutako harri-hormak, harlanduzko eskantzuak eta armonikoki banatutako baoekin. Beheko solairua, solairu nagusia eta ganbara zituen.

## Historia

Aundizabal baserria estreinakoz XVI. mendean aipatzen da (1573), baina 1391 urtean ospatu zen Zizurkil eta Tolosako hiribilduaren arteko auzotasun aktan parte hartu zuten bizilagunen artean Pero d'Andiaçaval izeneko pertsona batek hartu zuen parte, hortaz, litekeena da ordurako eraikita egotea. Aundizabal udalerri honetako jatorrizko 21 oinetxeetako bat zen, eta ondorioz, armarri heraldikoa edukitzeko eskubidea zuen. XVII. mendearen erdialdean Pedro Ruiz Andiazabalek berreraiki zuen sute baten ondorioz eraikina erabat suntsituta geratu ondoren (*"la nueva fabrica que hizieron en ella por yncendio que subcedio de cosa fortuito"* -1647-). Une horretan bere hatuak izango dira: 2 sagardo kupel, 2 kutxa, 2 ohe eta nekazaritzan aritzeko tresnak. Urte batzuk beranduago, 1697an eta gero berriro 1705ean, garrantzia gutxiagoko lanak egingo dira etxean, nahiz eta ia gaurdaino iritsi den eraikina aurrekoa izan. 1694 urtean basetxeko jabeek errentan jarri zuten ondorengoaren truke: zilarrezko 36 erreal, lurrak ongarritzeko karobi bat egitea eta 120 sagarrondoren landaketa. Hurrengo mendeko erdialdean dagoeneko bi etxebizitza independenteetan banatuta ageri da eta bakoitza bere aldetik alokatu zen.


Baserriaren fatxada nagusia (2000).

Zizurkilgo Udala


Baserriaren ikuspegi orokorra (2005).

Joxin Azkue

## Baserriaren jabeak:

Andiazabal, Joanes & Ateaga, Domenja (1573)
Andiazabal, Pedro Ruiz& Irazu, Maria Joanes (1634)
Andiazabal, Maria & Beldarrain, Apolinario (1647)
Zumeta, Nicolas (1681)
Zumeta, Jose Maria & Alzate, Maria Josefa (1722)
Zumeta, Francisco Antonio (1744)
Zumeta, Miguel Ignacio & Osandola, Maria Josefa (1752)
Zumeta, Juan Antonio & Lubelza, Maria Engracia (1781)
Zumeta, Francisco Maria (1800 b.l.)
Zumeta, Jose Ramon & Lizarraga, Maria Josefa (1800)
Zumeta, Juan Luis (1846)
Zumeta, Isabel & Zatarain, Meliton (1872)
Zatarain, Ambrosio & Ibañez, Concepcion (1920)
Ugartemendia, Jose Joaquin & Iturrioz, Micaela
Ugartemendia, Juan Tomas & Urretabizkaia, Josefa (1961 b.l.)
Ugartemendia, Joaquin & Lazkano, Maria Luisa (1961)
Ugartemendia Lazkano sendia

## Etimologia

*Aitz/az* eta *garate* (igarobidea edo ataka).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Zarateko pasabidera doan bide zaharraren ertzean, muino txiki batean.




Koordenadak:
UTM: X: 574655; Y: 4784825; Z: 243
Geografikoak: Luz.: -2° 4′ 51.4″; Lat.: 43° 12′ 42.2″; Alt.: 243


Joxin Azkue

Baserriaren atzealdeko fatxada (2004).

## Deskribapena

Baserri neoklasikoa, harri-hormak eta egurrezko egitura duten eta XVIII. mendean eraikiak izan ziren baserrien motakoa. Ondoren berritua izan zen (XIX. mende amaieran). Oso eraikin neurritsua eta dimentsio handikoa. Oinplano angeluzuzena du, mortero kapa batez estalitako harri-hormak ditu eta harlanduzko eskantzuak. Jatorrizko baoek ere harlanduzko lanez eginiko markoak dituzte (hegoaldeko etxaurrea) eta gainerakoek egurrezko ateburu sinplea dute. Eraikina berriki handitu egin da mendebalderantz eta estalkia erabat berritu da. Eraikinaren barne egitura erabat berrituta dago aipatutako handitze lanez geroztik eta ez da bere jatorrizko egiturako arrastorik geratzen.

## Historia

Azkarate baserriari buruzko lehen idatzizko erreferentzia XVI. mende amaierakoa da (1592). Hala ere, 1391 urtean ospatu zen Zizurkil eta Tolosako hiribilduaren arteko auzotasun aktan parte hartu zuten bizilagunen artean Ihoan d'Azcarate izeneko bizilagun bat zegoen, hortaz, litekeena da orduko eraikita egotea. XVII. mende erdialdean eta ia mende batez, horma mehelin batez bereizitako bi etxebizitzetan banatuta egon zen, 1668 urtean Antonio López de Azkarate hil ondoren. Zati bakoitzeko jabeek auzi ezberdinak izan zituzten bakoitzaren mugen inguruan eta azkenik, elementu komun bezala finkatu ziren atalondoa, igoera eskailerak eta ogiarentzako labea zuen alboko estalpea. Bi zati hauek azkenik batu egingo ditu Jacinto Urkizuk 1764 urte inguruan, eta segur aski, une hartan burutu zen eraikinaren erabateko berrikuntza, gaurdaino iritsi dena. XIX. mende amaieran baserria berriro berreraiki behar izan zen II. Gerra Karlistaren ondoren (1871-1875) etxea suntsituta geratu baitzen (*"incendiada durante la ultima Guerra Civil …ha quedado convertida en ruinas"*). Obra jatorrizko hormak eta baoak berrerabiliz egin zen.


Baserriaren kokalekua (2009).

### Baserriaren jabeak:

Azkarate, Luis (1592)
Azkarate, Antonio Lopez & Antziondo, Mariana (1668 b.l.)

**Baserri ½**
Azkarate, Francisco (1668)
Azkarate, Mariana & Jenoa, Jose (1688)
Jenoa, Francisco (1743)
Azkarate, Catalina Antonia; Rigan, Maria Rosa (1754 b.l.)
Jenoa, Sebastiana (1754)

**Baserri ½**
Azkarate, Ana Maria (1668 b.l.)
Labandibarro, Mariana & Lakarra, Antonio (1668)
Azkarate, Francisco & Etxeberria Irarragorri, Catalina (1717 b.l.)
Azkarate, Juan Lopez & Goikoetxea, Ursula (1717)
Isasi, Maria Salvadora & Urkizu, Jacinto (1764)
Urkizu, Francisca Antonia & & Muñoa, Juan Antonio & Pagola, Miguel Ignacio (1783)
Pagola, Maria Ignacia & Rekondo, Pedro Francisco (1838)
Rekondo, Juan Cruz (1857)
Rekondo, Josefa Antonia & Beobide, Gabriel (1879 b.l.)
Muñoa, Miguel (1879)
Amonarriz, Ignacio (1879)
Muñoa, Miguel (1898)
Arruabarrena, Atanasio, Gervasio eta Julian (1907)
Errandonea, Manuel (1936)
Arruabarrena, Atanasio & Etxeberria, Rosalia (1936)
Arruabarrena, Josefa Ignacia eta Martin (1963)
Kortajarena, Antonio (1980)
Kortajarena Iribar sendia

# 29. Beibategi

## Etimologia

*Bei* (ihintza) eta *–tegi* atzizki lokatiboaz osatuta. Bere formulaziorik zaharrenean *Beirategui* (1692) edo *Beguibategui* (1752) bezala ageri da.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Errekaillun ibaiaren ibarrak osatutako lautadan,
Adunatik ez oso urrun.



Koordenadak:
UTM: X: 576470; Y: 4783539; Z: 61
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 31.6″; Lat.: 43º 11′ 59.9″; Alt.: 61


Baserriko fatxada nagusia (2009).

## Deskribapena

Duela denbora gutxi berritutako baserria. Oinplano angeluzuzeneko eraikina, kareztatutako harri-hormekin eta harlanduzko eskantzuekin. Baoek harlanduzko lanez eginiko markoak edota harlandu-imitaziozko plakatua dute eta guztiak duela gutxi egindakoak dira. Barnealdea ere erabat berrituta dago.
Eraikina, gaur egun ostalaritza zerbitzuetara bideratuta dago, eta sagardotegi bezala izan zuen jatorrizko erabilera berreskuratu du.


Bartolome Auzmendi
Baserria berritu aurretik (1974).

## Historia

Beibategi baserriaren eraikuntza nahiko berantiarra izan zen eta litekeena da XVII. mendeko bigarren erdialdekoa izatea. Baserria honi eginiko lehen aipamena 1692koa da. Une horretan baserria Martin Telletxeari alokatu zitzaion, urteko errenta hauxe zen: zilarrezko 100 erreal eta bi kapoi.
Jatorrizko eraikin honen arrastorik ez da iritsi gaurdaino.


Joxin Azkue
Baserriaren atzealdeko fatxada (2004).

## Baserriaren jabeak:

Zatarain, Martin (1692)
Basetxe ½
Beldarrain, Gabriel & Eznarrizaga, Francisca (1718)
Beldarrain, Alejandro (1734)
Beldarrain, Josefa Ignacia & Artola, Juan Ignacio (1775)
Artola, Miguel Antonio eta Maria Martina (1839 b.l.)
Artola, Juan Jose & Obineta, Maria Bautista (1839)
Artola, Juan Cruz (1868)
Basetxe ½
Mendioroz, Maria Francisca & Arraras, Jose (1783)
Arraras, Antonio Ramon (1805)
Plaza, Antonio & Silva, Isabel (1855 b.l.)
Plaza, Antonio (1855)
Basetxe osoa
Otano, Jose Bernardo & Odriozola, Clara Ignacia (1885)
Otaño, Delfin & Zaldua, Juana (1912)
Iztueta, Francisco & Bengoetxea, Orosia (1969)
Iztueta, Maria Soledad, Josefina eta Jose Maria (1985)
Zubizarreta Lertxundi sendia

# 30. Beldarrain

## Etimologia

Bere izena eraikitzailearen abizenetik dator: Joaquín Beldarrain.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Bailarako beheko zatian, Villabona
Asteasurekin lotzen duen errepidearen ertzean.




Koordenadak:
UTM: X: 576320; Y: 4782758; Z: 61
Geografikoak: Luz.: -2º 3′ 38.6″; Lat.: 43º 11′ 34.6″; Alt.: 61




Buenavista eta Beldarrain Berri baserriak, gaurko baserriaren aurrekariak (1940?).

## Deskribapena

XX. mendean erabat berritua izan zen baserria eta etxebizitza bloke bat bihurtu zen. Oinplano angeluzuzena du eta kanpoaldeko paramentua, baoak eta barnealdeko egitura material modernoak erabiliz erabat berrituak izan dira. Fatxada duela gutxi berritu da (2005).




Baserria berritu aurretik (1987).

## Historia

Beldarrain baserriaren historia laburra da, baina aldaketa eta transformazioz beteta egon da. Jatorrizko baserria oraingo kokalekutik gertu eraiki zuen Joaquin Beldarrainek 1765 urtean bere jabetzakoa zen Ihartza baserriko lursail batean. Eraikin berria, beste jabetza batzuekin batera Ihartza oinetxeko maiorazgora gehitu zuen eraikitzaileak bere alaba Ignacia Joaquina Beldarrain Miguel Antonio Lizarragarekin ezkondu zenean, 1782 urtean. XIX. mende amaieran (1882) eraikina bi etxebizitza independentetan banatuta zegoen eta ondoko egitura zuen: beheko solairua, solairu nagusia eta ganbara. Hamarkada bat beranduago horrela deskribatzen zen: *"solar de la derruida caseria Beldarrain"*. Partzela Gregorio Usandizagari saldu zitzaion eta honek, 1894 urtean etxe txikiago bat eraiki zuen orubean eta Beldarrain txikia edo Buenavista izenaz ezagutu zen. Lau urte beranduago, alboan, ekialderantz, beste bat eraiki, eta Beldarrain Berri bezala ezagutuko zen. Gaspar Dorronsorok biak erosi zituen 1947 urtean, eraitsi egin zituen eta oinplano berriko eraikin bat altxa zuen bertan, gaurdaino iritsi dena.

### Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Antonio Joaquin & Zubeldia, Maria Ignacia (1765)
Beldarrain, Ignacia Joaquina & Lizarraga, Miguel Antonio (1782)
Lizarraga, Joaquin Ignacio & Urkidi, Ana Josefa (1814)
Lizarraga, Miguel Joaquin & Ibarrolaburu, Marcelina (1853)
Lizarraga, Pedro Juan & Goenaga, Maria (1862)
Lizarraga, Jose Luciano eta Domingo Joaquin (1892)
1907 oinetxea
Buenavista
Usandizaga, Gregorio (1894)
Belamendia, Felipe (1898)
Zuaznabar, Mariano & Berasategi, Martina (1906)
Uriarte, Ramon, Jose eta Carmen (1942)
Beldarrain Berri
Usandizaga, Gregorio (1894)
Belamendia, Felipe (1898)
Lizaso, Pedro Jose & Arsuaga, Genara (1899)
Lizaso, Santiago (1903)
Zuaznabar, Mariano & Berasategi, Martina (1906)
Uriarte, Ramon, Jose eta Carmen (1942)
Beldarrain
Dorronsoro, Gaspar (1947)
Dorronsoro, Gaspar & Etxenagusia, Josefa (1947)
Jabekide ezberdinak

## Etimologia

Venezia hiri italiarretik zuzenean eratorritako izena. Izen mota hau nahiko ohikoa da gure udalerrietan, agian, jabeen jarduera edo kulturarekin duten loturagatik (Londres, Babilonia, Argel,...).

**Baserriaren ustezko kokapenaren ikuspegi orokorra (2010).**

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta zegoen.

Adunara jaisten den errepidearen alboan.




Koordenadak:
UTM: X: 575417; Y: 4783627; Z: 109
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 18.2″; Lat.: 43º 12′ 3.1″; Alt.: 109



GAO. OA 6758

Baserria mende hasieran (1914).

## Deskribapena

Baserria gaur egun erabat desagertuta dago eta bere kokalekua soilik ezagutzen da. Gaur egun, kokaleku horretan belardi bat dago. Dirudienez, oinplano karratua zuen eraikin bat zen, kareztatutako hormekin, eta fatxada nagusian egurrezko egiturarekin. Eraikinak gehigarri bat zuen ekialdeko fatxadan, baserria handitzeko.



Baserria kokatuta zegoen lursaila erakusten duen airetik hartutako bista (1954).

## Historia

Benezia baserriari buruzko daturik zaharrena XVI. mende amaierakoa da (1595). Urte honetan Millan San Millanek, bere izeneko oinetxeko jaunak, baserri hau erosiko du (*"una cassa …llamada Beneçia que esta junto a la iglesia"*). Ez da ezagutzen baserria zein urtetan eraiki zen eta ezta bere izena nondik datorren ere.

Etxea judizialki bahitu zen 1681 urtean Teresa San Millanen (Miguel Okendo kapitain ezagunarekin ezkonduta) ondasunen kontra eginiko hartzekodunen konkurtso batengatik eta Lasarteko Brigidatarren komentuari entregatu eta beraien esku egongo zen 1855 urtean desamortizatu zen arte.

Urte batzuk beranduago, 1885 urtean, eraikina beheko solairua, solairu nagusia eta ganbaraz osatuta zegoela aipatzen da, argazki zaharretan ikus daitekeen bezala. 1930 urtean dagoeneko sute batean suntsitu zela aipatzen da (*"solar de caseria destruida por el incendio"*). Une horretatik aurrera, eraikina ez zen berreraiki eta suntsitzen joan zen erabat desagertu arte.





ARCHV. PD 503-01

1791ko planoa San Millango Jauntxoaren jabetasunen mugekin.

### Baserriaren jabeak:

San Millan, Gracia & Amitegi, Juan (1595 b.l.)
San Millan, Millian Ruiz & Okendo, Juana (1595)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Brigidatarren Komentua (Lasarte) (1681)
Ogasun Ministerioa (1855)
Barrena, Joaquin & Zaro, Micaela (1867)
Barrena, Remigia & Etxaniz, Fulgencio (1872)
Etxaniz, Luis, Juan, Eugenio eta Jorge (1897)
Otegi, Juana Josefa (1930)
Mendizabal, Antonio & Mendizabal, Ines (1930)
Mendizabal, Baltasar (1976)

## Etimologia

*Bengo* (behean) eta *etxe* hitzez osatuta dago. Zaldu eta Zalduzar etxeekiko zuen kokalekuari egiten dio erreferentzia. Dokumentaziorik zaharrenaren arabera *Zaldua Bengoetxea* (1570) bezala izendatzen da, bere jabeei, Zaldua familiari, erreferentzia eginez.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Zalduerrekako ubidea eta Asteasuko mugatik gertu, zelaigune zabal batean.

Koordenadak:
UTM: X: 574199; Y: 4783611, Z: 112
Geografikoak: Luz.: -2º 5′ 12.2″; Lat.: 43º 12′ 3″; Alt.: 112




Joxin Azkue

Baserriaren fatxada nagusia (2005).

## Deskribapena

Duela gutxi guztiz berritu da (1992). Eraikin berria material modernoekin eraiki da eta ez du aurreko eraikineko elementurik gorde.

## Historia

Bengoetxea basetxea 1570 urtean aipatzen da estreinako aldiz, Domingo Zaldua eta Jordana Eizmendiren arteko ezkontza-kontratuan. Mende bat lehenago Juan de Bengoechea izeneko bizilagun bat aipatzen da Kontzejua eta San Millan jaunaren artean herri-baso batzuen inguruan sortu zen konkordia batean (1457).


Joxin Azkue

Baserriaren kokalekua (2005).

Baserri hau, Malkorrarekin batera (abereen borda izandakoa), bere izeneko maiorazgoan sartu ziren bere jabea, Gabriel Elizondo, ezkondu zenean (1747). Azken berrikuntzak egin aurretik, eraikinak egitura hau zuen: beheko solairua (atalondoa, sukaldea, bi gela eta bi ukuilu), solairu nagusia (hiru gela eta aletegia) eta ganbara.

### Baserriaren jabeak:

Zaldua Bengoetxea, Domingo & Eizmendi, Jordana (1570)
Zaldua, Pedro (1615)
Elizondo, Joanes (1703)
Elizondo, Antonio & San Millan, Maria Josefa (1745)
Elizondo, Gabriel & Beldarrain, Maria Ignacia (1750)
Eliondo, Miguel Antonio & Irisarri, Maria Antonia (1779)
Elizondo, Jose Domingo & Erauskin, Maria Jesus (1789)
Elizondo, Juan Fermin (1836 b.l.)
Elizondo, Nicolas Maria (1836)
Zarranz, Jose Joaquin (1853)
Arrillaga, Severino (1901)
Atxaga, Jose Jacinto & Makuso, Jeronima (1902)
Atxaga, Jacinto & Tapia, Maria Asuncion (1923)
Urkola, Inaki (1992)
Urkola Ibarbia sendia

## Etimologia

*Beraza/beratz* (behea) eta *-tegi* (paraje baxua) atzizki lokatiboaz osatuta.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Asteasuko errekako ubidearen gainean dagoen zelaigunean, Asteasuko mugatik gertu.




Koordenadak:
UTM: X: 574558; Y: 4782816; Z: 92
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 56.7″; Lat.: 43º 11′ 37.1″; Alt.: 92


Patxi Otegi

Baserria azken berrikuntza aurretik (1987).

## Deskribapena

Dolare-baserri motakoa, XVI. mendean edo XVII. mendeko lehen erdian eraikia. Eraikina bi etxebizitzatan banatuta dago eta alderdi bakoitzak garapen ezberdina izan du. Oinplano angeluzuzena du, kareztatutako harri-hormekin, ekialdean izan ezik, itsatsita dagoen gehigarria material modernoak erabiliz egin baita, jatorrizko irudia partzialki deformatuz. Fatxada nagusiko elementu azpimarragarriena sarrerako dobelatutako eta apur bat punta forma duen arku handi bat da eta jatorrizko eraikuntzatik mantentzen da. Teilatupean argi eta garbi ikusten dira bi eraikuntza ezberdinak. Ekialdeko zatiak oholtza bidezko itxiera mantentzen du eta bertan habeari "enarabuztana" moduan lotzen zaion txarrantxa bat bereizi daiteke, jatorrizko eraikuntzako elementua. Beste erdia duela gutxi berritua izan da. Aipatutako itxieraren zati bat ezabatu egin da eta egurrezko balkoi batek ordezkatu du. Azken kasu honetan itxiera (eta orain balkoia) fatxadatik apur bat irteten dira hegalkin baten bidez.

Barrualdeko egitura nahiko egoera onean kontserbatzen da, bere jatorrizko armaduraren zatirik handiena bereizi daitekela. Egurrezko osoko pilare multzo batez osatuta dago eta hauek goihabeak eta frontalak eusten dituzte, aurrealdetiko mihiztadunarekin montatutako txarrantxekin indartuta. Elementurik esanguratsuena sagardo dolare zaharreko lau berniak dira, izan ere, oraindik euren jatorrizko kokalekuan daude. Hauek jatorrizko eraikinaren oinarrizko armazoia osatuko lukete.

## Historia

Berastegi baserria estreinako aldiz XVI. mendearen erdialdean aipatzen da, basetxe honetatik gertu igarotzen den ubide baten urlasterraren aldaketagatik jarritako auzi batean (1549). Hala ere, litekeena da basetxe hau aurreko mendean dagoeneko eraikita egotea. Berastegi udalerri honetako jatorrizko 21 oinetxeetako bat da, eta ondorioz, armarri heraldikoa edukitzeko eskubidea du. Berastegi baserria bere izeneko maiorazgoan sartu zen XVIII. mendeko erdialdean, beste jabetza batzuekin batera; Burrustidi basetxea eta Konporta eta Bereteriokoak Asteasun, eta bere errota, baita ere azken jurisdikzio honetan.

Baserria errentan egon ohi zen. 1740an, bere kolonoak, Martin Loinazek, ondoko urteko errenta ordaindu behar zuen: 84 dukat, 4 kapoi, bere artaldeko ardien 5 simaur-gurdi eta baserriaren atzealdean zubi bat eraiki (*"para la entrada al primer suelo o desvan de ella un puente de mamposteria con sus antepechos"*). XIX. mende hasieran baserria bi etxebizitzatan banatuta zegoen eta bakoitza bere aldetik alokatzen zen.


Baserriaren fatxada nagusia (2009).


Joxin Azkue

Fatxada nagusia. Teilatupeko egituraren xehetasuna (2004).





**Sagardo tolareko jatorrizko lau bernien multzoa (2009).**


Etxeko sarrerako puntadun baoa (2009).


"Enara-buztana" motako lotura baten xehetasuna (2009).

## Baserriaren jabeak:

Berastegi, Maria Martinez & Berastegi, Garcia Alvarez (1526)
Berastegi, Maria Martinez & Beñaran, Anton (1541)
Beñaran, Barbara (1629 b.l.)
Zabala, Domingo & Erauskin, Barbara (1629)
Zabala, & Larrañaga, Maria Miguel (1691 b.l.)
Zabala, Juan Bautista (1691)
Zabala, Juan Millan (1734)
Zabala, Pedro Jose & Goitia, Josefa Antonia (1780 b.l.)
Zabala, Jose Antonio & Mendizabal, Manuela Martin (1780)
Zabala, Manuel Jose & Etxezarreta, Catalina (1831)
Zabala, Luis & Irazusta, Antonia (1844)
Zabala, Santos & Aldai, Maria Felicitas (1901)
Zabala, Maria Carmen, Luis Maria, Jose Antonio, Juan Manuel eta Maria Victoria (1973)
Mujika, Francisco & Izagirre, Maria Pilar (2000)
Mujika Izagirre sendia

## Etimologia

*Bide* eta *gurutze* hitzez osatua, bidegurutze historiko batetan duen kokaleku estrategikoari erreferentzia egiten dio. Ondoko izenekin ere aipatzen da: *Bidaguruçe* (1540); *Bideguruce* (1693) edo *Bidegurutzeta* (1858).

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatua dago.
San Miguel ermitatik gertu, Adunatik
Zizurkilera doan herribide zaharraren alboan.



Koordenadak:
UTM: X: 575826; Y: 4783692; Z: 109
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 0.1″; Lat.: 43º 12′ 5.1″; Alt.: 109

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri neoklasikoa. Oinplano angeluzuzena duen eraikin sinplea, kareztatutako harri-hormekin. Eskantzuetan harlanduzko lanak bereizi daitezke, kareztatutakoaren azpian. Eraikina mendebalderantz handitu eta estalkia berritu zen eta ekialderantz berriz, gehigarri moderno bat atxiki zitzaion.



Zizurkilgo Udala

**Baserriaren iparraldeko eta mendebaldeko fatxadak (2000).**



Joxin Azkue

**San Miguel ermita ondoko basetxea (2004).**

**Baserriaren mendebaldeko fatxada (2009).**

## Historia

Bidegurutze baserria XVII. mendearen hasieran aipatzen da estreinakoz Zizurkilgo kontzejuak hiribildu titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserri zerrenda batean ageri baita (*"la casa de Vidaguruce"*). Hala ere, mende erdi lehenago Maria de Bidaguruçe (1540) izeneko bizilagun bat aipatzen da dokumentazioan, hortaz, litekeena da ordurako eraikita egotea. XVIII. mende erdialdean, bere jabeek, Juan Bautista Irazu eta Catalina Andiazabalek maiorazgo berri bat sortzea erabaki zuten bakoitzak zituen jabetzak batuz (Bidegurutze, Astaurre, Zaldundegi eta Etxebitarte basetxeak Zizurkilen eta Lizarraga basetxea Villabonan) euren seme Joaquin Irazuren ezkonsari bezala (1752).



Zizurkilgo Udala

**Juanito Otegi eta Karmen Arruti Arantxa Arrutirekin (ezkerraldean) Ernioko erromeriatik bueltan (1950).**



Zizurkilgo Udala

**Juanito Otegi eta Karmen Arruti etxeko sukaldean seme-alabekin: Jose Agustin, Xalbador eta Xabier (1967).**



Zizurkilgo Udala

**Juanito Otegi, Xabier Otegi eta Maritxu Salaberriarekin saskiaren barruan (1969).**

Zizurkilgo Udala



Juanito Otegi eta Karmen Arruti ezkontza egunean (1956).

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Joanes (1632)
Beldarrain, Apolinario & Andiazabal, Maria (1649)
Zumeta, Nicolas (1681)
Andiazabal, Martin (1688)
Andiazabal, Catalina & Irazu, Juan Bautista (1712)
Irazu, Joaquin & Etxabeguren, Maria Ramos (1752)
Irazu, Juan Bautista & Zelaia, Josefa Antonia (1782)
Irazu, Jose Joaquin & Alkorta, Ana Josefa (1806)
Irazu, Jose Antonio (1841)
Lizarraga, Joaquin (1850)
Azkune, Basilio (1907 bl.)
Atxaga, Jose Jacinto eta Irazu, Roberto (1907)
Aranburu, Cipriano (1911)
Otegi, Juan & Arruti, Carmen
Otegi Arruti sendia

Joxin Azkue



Baserriaren alboko fatxada (2004).

# 35. Bikarioetxezar

## Etimologia

Etxe honen izenaren esanahia bere jabearekin lotuta dago, toki horretako bikarioa edo parrokoa, eta etxe eta *zahar* hitzez osatua. *Zahar* hitzaren esanahia aztertuz, egiteko bererako eraikuntza berri bat eraiki zela ulertzen da.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Larretin baserritik gertu dagoen muino batean. Herrigunearen goialdean.



Koordenadak:
UTM: X: 575235; Y: 4783389; Z: 122
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 26.4″; Lat.: 43º 11′ 55.5″; Alt.: 122

## Deskribapena

Baserri neoklasikoa, XVIII. mendean eraikitako egurrezko egitura eta harri-hormadun motakoa. Oinplano karratua du, kareztatutako harri-hormekin eta harlanduzko eskantzuekin. Jatorrizko baoek harlanduzko markoa dute eta gehienak fatxada nagusian daude. Gainerakoak ez dira aipagarriak. Iparraldeko fatxadaren kontra duela gutxi berritua izan den eraikin bat dago itsatsita. Eraikinaren barne-egitura guztiz berritua izan zen duela zenbait urte. Jatorrizko eraikinetik mantendu den gauza bakarra lehen solairuan dagoen eta frontal bat eusten duen pilare bat da.



**Baserriaren alboko fatxada (2009).**



**Baserriaren atzeko fatxada (2009).**

## Historia

Bikarioetxezar eraikina XVIII. mendean altxatu zen, hala ere, hurrengo mende arte ez da berari buruzko daturik azalduko. Lehen erreferentzia horrek 1855 urtetik haratago garamatza, Estatuak bere jabetza hartuko duenean elizaren jabetzak desamortizatu ondoren. Urte batzuk beranduago Jose Francisco Muñagorriri saldu zitzaion (1867).



Zizurkilgo Udala

**Amado Labaien (goian eta erdian) lagun talde batekin (1942).**



Zizurkilgo Udala

**Juanito Labaien eta Rosario Urkola baserriaren aurrealdean seme-alabekin: Antonio, Arantxa eta Joxe (1969).**



Zizurkilgo Udala

**Juanito Labaien eta Rosario Urkola Zaldu azpikoa baserriaren ate aurrean (1945).**



Zizurkilgo Udala

**Arantxa Labaien (behean, erdialdean, betaurrekoekin) dantza-taldeko lagun batzuekin (1963).**

## Baserriaren jabeak:

Ogasun Ministerioa (1855)
Muñagorri, Jose Francisco & Pagadizabal, Manuela (1867)
Muñoa, Marcos Antonio & Pagadizabal, Manuela (1880 b.l.)
Muñoa, Juan Cipriano eta Miguel (1880)
Labaien, Pedro & Gurrutxaga, Ignacia (1927)
Labaien, Amado (1937)
Labaien, Juan & Urkola, Maria Rosario
Labaien Etxezarreta sendia
Labaien Bengoetxea sendia

# 36. Birautzberri

## Etimologia

Bere izena *bide*, *gurutze* eta *berri* hitzez osatuta dago. Berri hitza izen berbera duen beste basetxe batetik bereizteko asmoz gehitu zitzaion. Dokumentalki *Vidaguruce berria* (1877) edo *Virautz Berri* (1908) izenekin ageri da.

Joxin Azkue

**Baserriaren ustezko kokalekuaren ikuspegi orokorra (2005).**

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta zegoen. San Miguel ermitatik gertu dagoen lautada batean zegoen, Adunatik Zizurkilera doan errege-bide zaharraren alboan.






San Miguel eta Bidegurutze baserriak, lehen planoan, eta Olatza, atzean. Handik gertu zegoen kokatuta baserria (2005).

## Historia

Birautzberri baserriaren historia nahiko laburra da. 1877 urteko txosten baten arabera, baserria 1847 urtean eraikia izan zen eta 1874 urtean berreraikia (*"construida el año mil ochocientos cuarenta y siete y reconstruida en mil ochientos setenta y cuatro con las anteriores paredes"*). Bere jatorria teilape batean bilatu behar da (*"la tejabana llamada Videguruzco barrera"*). Izen bereko basetxeko parte zen eta bere inguruan kokatuta zegoen. Martin Ibarbiak erosi zuen eta kokaleku horretan oinplano berriko etxe bat altxatu zuen. Eraikina hiru hamarkada ondoren berreraikia izango da, II. Gerra Karlistan zehar erre egin baitzen (1874). Etxe hark beheko solairua, dolaredun solairu nagusia eta ganbara zituen. 1948 urtean dagoeneko orube bezala ageri da (*"reducida a solar"*), eta ez zen berriro eraiki, guztiz desagertu zen arte.

## Baserriaren jabeak:

Ibarbia, Martin & Beldarrain, Maria Micaela (1847)
Ibarbia, Antonio, Miguel Ignacio, Jose Maria, Jose Francisco, Francisco Ignacio, Josefa Antonia eta Pablo (1883)
Goenaga, Miguel (1886)
Irazu, Roberto (1895)
Aranburu, Cipriano (1911)
Otegi, Andres & Urkia, Agustina (1911)
Otegi, Jose (1918)

## Deskribapena

Gaur egun desagertuta dago baserria. Ez da bere kokaleku zehatza ezagutzen eta ez dago bere arrasto fisikorik.

# 37. Burrustidi

## Etimologia

*Burru* (hurrizti) eta atzizki lokatiboaz osatuta dago. Toki horretako toponimiari erreferentzia egiten dio, hala ere, jatorrian, bere eraikitzailearen izenaz ezagutuko da: *Zabala Iguerapide* (1752).

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Asteasuko errekako ubidetik gertu dagoen ibai-terraza batean.




Koordenadak:
UTM: X: 575563; Y: 4782583; Z: 79
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 12.3″; Lat.: 43º 11′ 29.2″; Alt.: 79


Patxi Otegi

Baserriaren kokalekua (1987).

## Deskribapena

XX. mendean berreraikitako baserria, esklusiboki bizileku funtziotarako erabilia. Oinplano angeluzuzeneko eraikina, material modernoekin egina.

## Historia

Burrustidi baserriaren jatorria XVIII. mende hasieran kokatu behar da, Juan Millán Zabalak Berastegi basetxearenak ziren lurretan eraikitzen ari zela dioenean (*"la caseria que esta fabricando …en Yguerabide"*) 1734 urtean. Horrela dakigu etxea mende horren amaiera arte bere eraikitzailearen abizenaren bidez ezagutzen dela, gaur egun ezagutzen den izena jarri zitzaion arte.

Berastegi eta Burrustidi basetxeak, desagertutako Konporta basetxearekin batera, Berastegiko maiorazgoan barneratu ziren eraiki eta denbora gutxira. 1887 urtean baserria horrela osatzen zen: beheko solairua bi sukalde eta ukuiluarekin, solairu nagusia 5 logela eta ganbara.

1973an baserrian sute bat jasan zuen eta "*quedó totalmente destruido*" gero berria berreraikiko zuten.

### Baserriaren jabeak:

Zabala, Juan Milllan (1734)
Zabala, Pedro Jose & Goitia, Josefa Antonia (1780 b.l.)
Zabala, Jose Antonio & Mendizabal, Manuela Martin (1780)
Zabala, Manuel Jose & Etxezarreta, Catalina (1831)
Zabala, Luis & Irazusta, Antonia (1844)
Zabala, Santos & Aldai, Maria Felicitas (1901)
Zabala, Maria Carmen, Luis Maria, Jose Antonio, Juan Manuel eta Maria Victoria (1973)
Bengoetxea, Jose Maria; Txapartegi, Pedro; Arruti, Jose Francisco (1987)
Arruti Ibarguren sendia



Baserriaren atzeko fatxada (2010).

## Etimologia

*Egi* (hegal) eta *–eta* atzizki lokatiboaz osatuta dago. Basetxea *Eguieta* izenaz ezagutzen da, eta zenbaitetan, *Ezquieta* (1854) edo *Egita* (1873) bezala.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Zarateko mendatera igotzen den bidearen alboan dagoen muino txiki batean.



Koordenadak:
UTM: X: 575313; Y: 4784495; Z: 196
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 22.4′′; Lat.: 43º 12′ 31.3′′; Alt.: 196

## Deskribapena

Duela gutxi berreraikia izan da baserria (2004). Oinplano angeluzuzena du eta jatorrizko horma perimetralen zati bat mantentzen du beheko solairuan eta lehen solairuan. Teilatupea berriz, material modernoekin egin da. Kanpoaldeko itxura guztiz berriztatua izan da, bere barne-egitura bezalaxe.


Joxin Azkue
Baserriaren kokalekua (2005).

## Historia

Egieta baserriaren jatorria XVII. mendeko azken hamarkadetan kokatu behar da, Joanes Etxenagusia eta Mariana Irarragorrik bere jabetzako lursail batean altxa zutenean (*"fue fabricada desde sus çimientos durante su matrimonio"* -1699-). Handik denbora gutxira, basetxe hau Arrieta eta Olatzakoarekin batera, Olatzako maiorazgora barneratu da eta Isabel Etxenagusiaren eskuetan geratu zen, eraikitzaileen alaba. Bere historiako beste gertaera garrantzitsu bat II. Gerra Karlistan zehar jazoko da eraikina erre egingo baita eta erabat suntsitu. 1873ko txosten baten arabera, eraikina berreraiki egin behar izan zen.


Joxin Azkue
Baserria obretan (2004).


Zizurkilgo Udala
Patxi Ibarbia eta Nicolasa Azpiroz, Jose Maria Azpiroz eta Jone Iruretagoienaren ezkontzan (1971).


Zizurkilgo Udala
Patxi Ibarbia eta Nicolasa Azpiroz ezkontza batean, eskubialdean (1969).


Zizurkilgo Udala
Nicolasa Azpiroz, eskubitara, ezkontza batean (1960).

## Baserriaren jabeak:

Irarragorri, Mariana & Etxenagusia, Juan (1699)
Etxenagusia, Isabel & Martin Larrondobuno (1710 b.l.)
Larrondobuno, Juan Martin & Gandarias, Maria Ignacia (1717)
Larrondobuno, Martin Manuel & Furundarena, Maria Josefa (1775)
Larrondobuno, Jose Antonio (1830)
Larrondobuno, Manuel Bernardo & Rekondo, Francisca Antonia (1847 b.l.)
Larrondobuno, Jose Antonio & Arbildi, Ramona (1847)
Muñagorri, Pedro Jose & Laskibar, Maria Gregoria (1847)
Muñagorri, Jose Miguel (1854)
Muñagorri, Jose Francisco & Larrunbide, Juana Francisca (1857)
Etxeberria, Pedro Ignacio (1862)
Arrese, Jose Ramon & Barandiaran, Felipa (1878)
Arrese, Jose Ramon, Felipa, Sotero, eta Emeterio (1885)
Pagola, Jose Maria (1904)
Arrizabalaga, Martin & Aranburu, Maria Josefa (1904)
Arrizabalaga, Jose Vicente & Otaño, Ambrosia (1914)
Ibarbia, Antonio Maria (1929)
Ibarbia, Jose Francisco & Azpiroz, Nicolasa (1953)
Ibarbia Azpiroz sendia

# 39. Elizalde

## Etimologia

*Eliz/eliza* eta *alde* (paraje) hitzek osatuta, elizatik gertu zegoela adierazten du izenak. Dokumentazioan *Eleiçalde* (1577) izenarekin ageri da, eta hortik eratorriko da gaur egungo izena.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta dago.
San Millan parrokia-elizatik metro gutxira,
Aduna eta Villabonara doan bidearen ondoan.



Koordenadak:
UTM: X: 575384; Y: 4783585; Z: 109
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 19.7″; Lat.: 43º 12′ 1.8″, Alt.: 109

## Deskribapena

Harri-hormak eta egurrezko egitura duten eta XVIII eta XIX mendeen artean eraikitako baserrien motakoa da. Oinplano karratua du eta kareztatutako harri-hormak eta harlanduzko eskantzuak eta harlanduzko markoak ditu ia bao guztietan.
Oso diseinu erregularra eta berdina du eta XX. mendeko lehen hamarkadetan zehar eginiko aldaketa multzo batek bakarrik hausten du jarraikortasun hori: atzealdeko fatxadan balkoi korritu bana gehitu da eta lehen solairukoa galeria modura itxia izan da. Teilatupeko hastiala ere itxi egin zen eta eraikin berriak erantsi. Gainera, sarrera nagusia ekialdeko fatxadara aldatu zen.

Joxin Azkue



Baserriaren kokalekua (2004).

Fototeka Kutxa



Baserriaren alboko fatxada berritu aurretik.

## Historia

Elizalde baserria lehenengo aldiz XVI. mende amaieran (1577) aipatu zen eta litekeena da mende horretako momenturen batean eraiki izana. Baserria Lasarteko Brigidatarren Komentuko jabetza izatera pasa zen Teresa San Millan, bere abizena zeraman etxeko andrearen ondasunen hartzekodunen konkurtsoan beraiei esleitu ondoren. 1792 urtean, Komentuko administratzaileak etxea saldu behar izan zuen aurreko urteko Gabonetan bere egituraren zati handi bat erori egin zelako, eta eroritakoa berreraikitzeak zuen kostua handiegia zelako. Jabe berriak, Juan Bautista San Millan eskribauak, eraikin berri bat altxatu zuen, eta hau izango da gaurdaino iritsi dena.

GAO. OA 6758



Baserria berrikuntzen aurretik (1914).

GAO. OA 6760



Baserria berrikuntzen aurretik (1948).

Joxin Azkue



Iparraldeko fatxada (2005).

### Baserriaren jabeak:

Elizalde, Maria & Alziturri, Joanes (1577)
San Millan, Millian Ruiz & Okendo, Maria (1590)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Brigidatarren Komentua (Lasarte) (1681)
San Milllan, Juan Bautista & Larrondobuno, Maria Ignacia (1792)
San Millan, Jose Bernardo (1813)
Lertxundi, Miguel Antonio & Etxeberria, Juana Francisca (1854)
Lertxundi, Francisco & Etxenagusia, Salvadora (1888)
Lertxundi, Miguel Jose (1892)
Aranburu; Sabina
Aranburu Barriola sendia

## Etimologia

*Eliz/eliza* erroa eta *ondo* (gertu, hurbil) hitzez osatuta, elizaren gertutasuna adierazteko. Eraikina *Pantzikane* bezala ezagutzen du jendeak.

## Kokapena

Zizurkilgo Herrigunean kokatuta dago. Villabonatik datorren eta Elbarrena ingurutik igarotzen den errepidearen gaur egungo sarbidearen inguran, San Millan (Markesene) etxetik oso gertu.

Koordenadak:
UTM: X: 575296; Y: 4783583, Z: 115
Geografikoak: Luz.: -2º 4′ 23.6″; Lat.: 43º 12′ 1.7″; Alt.: 115



## Deskribapena

Erabat berritutako baserria, ostalaritza funtzioak betetzen ditu beheko solairuan eta etxebizitza funtzioa du goiko solairuetan. Oinplanta angeluzuzena du, azken erreforman zehar *cara vista* modura ateratako harri-hormekin. Baoak erregularki banatuta daude, zementuzko marko moderno batez hornituak izan dira.

## Historia

Elizondo etxea XIX. mendeko azken mende laurdenean eraiki zuen Juan Luis Arizmendik San Millan markesari erosi zitzaion lursail batean. 1878an, eraiki zen urtean, eraikinak ondorengo egitura zuen: beheko solairua (sukaldea, ardo eta pattar denda, sagardo kupelentzako upategia eta ukuilua), lehen solairua (gelak, sukaldea, sagardo dolarea bere prentsekin), bigarren solairua (gelak) eta ganbara.


Bartolome Auzmendi

**Baserriaren fatxada nagusia berritu aurretik (1974).**


Joxin Azkue

**Eraikinaren atzealdeko fatxada (2004).**


Zizurkilgo Udala

**Pilar Imaz eta bere alaba, Milagros Mendizabal, Begoña Goenaga lagunarekin (erdian) etxeko sukaldean (1971).**

1921 urtean jatorrizko eraikinari gorputz berri bat gaineratu zitzaion hegoaldetik, sektore honetan Zizurkilerako sarrerak erreformatu zirelako. Iriarte Txikia, ondoko baserria, eraitsi egin behar izan zen erreforma hauek zirela medio eta erantsitako eraikin berria baserri horretako jabeei entregatu zitzaien.




**Antonio Mendizabal eta bere emaztea, Ines Mendizabal (1950).**




**Baltasar Mendizabal (eskubitara) beste pilotari batzuekin (1949).**




**Antonio eta Ines Mendizabal senar-emazteak etxaurrean euren seme-alabekin: Jabier, Baltasar, Josefa Antonia, Juanita, Maritxu eta Salvador (1940).**






**Errepide berriaren irekieraren planoa 1921 urtean. Horiz eraitsia izan zen Iriarte Txiki baserria eta arrosaz Elizondokoei emandako lursaila.**

## Baserriaren jabeak:

Arizmendi, Juan Luis (1878)
Olano, Baltasar Antonio & Bengoetxea, Maria Francisca (1884)
Mendizabal, Baltasar Antonio & Alkorta, Josefa Antonia (1907)
Mendizabal, Antonio Venancio & Mendizabal, Ines (1921)
Mendizabal, Baltasar & Imaz, Pilar
Mendizabal Imaz sendia

## Etimologia

*Erreka* eta *alde* hitzek osatzen dute: errekako aldea, Adunibar errekaren alboan dagoela argi adieraziz. Dokumentazioan *Recalde* izenez aipatzen da.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Ibai-terraza zabal batean, Adunibar erreka eta
Susperrotik jaisten den erreka biltzen diren lekutik gertu.




Koordenatuak:
UTM: X: 576378; Y: 4783591; Z: 71
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 35.7″; Lat.: 43º 12′ 1.6″, Alt.: 71

**Baserriaren alboko fatxada (2010).**

## Deskribapena

XIX. mendeko baserri neoklasikoa da. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, kareztatutako harri-hormekin. Harlanduzko obra eta baoen azpadura estalita daude, ipar-mendebaldeko fatxadako sarbidean izan ezik. Fatxada horri, eraikinarenaren handitze gisa, gaur egungo materialez egindako eraikuntza bat atxiki zaio eta zati batean estali egiten du.

Joxin Azkue



**Hegoaldeko fatxada (2005).**

Baserriaren barnealdeak oso partzialki mantentzen du zurezko egitura. Behe-solairua bi habeartetan banatuta dago eta bien artean harlanduzko-horma lodi bat dago, goiko solairuetan jarraipenik ez duena. Behe-solairuan bertan, habe frontalen bidezko sostengu-egituraren zati bat ikus daiteke. Teilatupean egitura hori aldatu egiten da, zutikoak eta astazaldiak erabiltzen baitira.

## Historia

Errekalde baserria XVIII. mendearen erdialdeko hamarkadetan eraiki zen. 1752an esaten zenez: *"caseria nueva nombrada Recalde"*, Gabriel Ameztoiren jabegoa. Jabeek errentan eman zuten baserria, eta urtero trukean 9 gari-anega, 19 arto-anega eta 10 gurdikada sagar jasotzen zituzten; guztira 100 dukat inguruko balioa zuela jotzen da (1776).

1887an esaten zenez, honako hauek zituen: behe-solairua (sotoa eta ukuiluak), solairu nagusia (sukaldea, hiru etzalekudun gela, logela bat eta dolareak), bigarren solairua (bi logela, etzalekua eta ganbara) eta sabaia. Erantsitako bi teilape ere baditu, gaur egungo maizterrak eginak. Jose Bernardo Otaño da, Pedro Maria Otaño bertsolari ospetsuaren anaia, biak ere baserri honetan jaioak dira eta.


Zizurkilgo Udala
Angel Garmendia eta Juanita Mendizabal Ernioko erromeriatik itzulian (1950).


Zizurkilgo Udala
Familiaren argazkia, baserriaren atarian (1966).


Zizurkilgo Udala
Eulalia Arregi, eskuinean Juanita Mendizabal laguna duela, etxeko atarian (1970).


GAO. OA 6751
Errekalde baserria XX. mendearen hasieran (1915).

Baserriaren eta inguruen planoa, inguruko errekasto baten ibilgua aldatzeko hitzarmen baten harira (1845).



Estalkiaren egitura, zutikoekin eta astazaldiekin (2008).

## Baserriaren jabeak:

Ameztoi, Gabriel & Zaldu, Maria Ignacia (1752)
Ameztoi, Martin Jose & Laskibar, Maria Micaela (1776)
Ameztoi, Manuel Fermin & Ihartza, Atanasia (1822)
Ameztoi, Josefa Ignacia (1862)
Ameztoi, Jose Benito (1905 b.l.)
Ameztoi, Antonino (1905)
Ameztoi, Maria & Juanmartiñena, Alfonso Juan (1945 b.l.)
Juanmartiñena, Maria Concepcion, Luisa eta Pilar (1945)
Garmendia, Angel & Mendizabal, Juana (1983)
Garmendia Mendizabal sendia

# 42. Errentenbarrendi

## Etimologia

*Erreten* eta *barrutia* hitzek osatzen dute izena. Dokumentazioan baserria izendatzeko hainbat aldaera erabiltzen dira: *Erretenbarrutia* (1391); *Erretenbarrundi* (1608); *Retembarrendi* (1632) edo *Erretabarrendi* (1747).

Joxin Azkue

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Hegalaren erdialdean dagoen zapalda batean, ikuspegi zabaleko inguruan.




Koordenatuak:
UTM: X: 574149; Y: 4783811; Z: 131
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 14.3″; Lat.: 43º 12′ 9.6″, Alt.: 131

## Deskribapena

Baserri gotiko-errenazentista da, baserri bilbaduradunen tipologiakoa. XVI. mendean eraiki eta hurrengo mendean goitik behera berriztatu zuten. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eta jatorrizko eraikuntzari egindako berrikuntzen eta berreraikuntzen ondorio diren hainbat paramentu ikusi ahal dira.
Jatorrizko eraikuntzari loturiko aztarnak mendebaldeko fatxadako beheko solairuan baizik ezin dira ikusi, harlandu handiz egindako paramentu batean. Bertan, gezileiho batzuk besterik ez daude horma zulatzen.
Geroago, XVII. mendearen erdialdean, eraikina goitik behera berriztatu zuten, kareztutako harri-hormekin eta eskantzuetan eta beheko solairuko bao askotan harlandua erabiliz. Lehenengo solairua ixteko, paldoz, zutoinez eta habez osaturiko bilbadura erabili zen. Ondorioz, leihoak eta ixteko hormak tartekatzen diren hormaatalak nabarmentzen dira. Hori oso garbi ikus daiteke hegoaldeko eta ekialdeko fatxadetan (geroago baserriari erantsi zioten eraikin batek iparraldeko fatxada baliogabetu baitzuen). Era berean, hegoaldeko fatxadako hormapikoaren erdialdean, usategi-zuloak dituen itxitura bat dago.
Eraikinaren barruko egitura egoera onean dago. Tamaina handiko harlanduzko pilareharrien gainean oinarritutako pilareek osatzen dute. Pilare horiek gailurreko habeen eta petralen pisuari eusten diote, haiekin mihiztatuta. Solairu guztietan txarrantxak erabili dira habe horizontalen pisuei eusteko, aho-ziri erako mihiztadurak erabiliz. Nabarmentzekoa da egituraren armadurako pieza askotan arotz-marka ugari ageri direla.


Atzeko fatxada (Mendeabaldea), jatorrizko baserriaren aztarnekin (2008).


Bartolome Auzmendi

Baserriaren fatxada nagusia (1974).


Arotz-markak zurezko egituran (2008).


Egiturako pilareak, harlanduzko pilare-harri handietan oinarrituta behe-solairuan (2008).

## Historia

Errentenbarrendi baserriari buruzko lehen aipamena XVII. mendearen hasierakoa da (1608). Dena dela, 1391n Miguel de Erretenbarrutia izeneko auzotar bat agertzen da Zizurkil Tolosa hiribilduari auzokidetzeko aktan parte hartzen, eta ondorioz pentsa liteke garai hartan baserria eraikita zegoela.

Hortik aurrera, baserri horri buruzko datuak ez dira oso ugariak eta ezinezkoa suertatzen zaigu etxean egindako lanen kronologiarik egitea. 1761ean, Miguel Antonio San Millan jabeak, 40 urtez maizter izan zen Juan Bautista Irazuri etxaldeari kalteak eragitea egotzi zion. Bere burua defendatzeko, etxaldean ez ezik, baserrian ere hainbat berrikuntza egin zituela esan zuen azken horrek: *"dos vigas principales que estan tomadas sobre piedra labrada y recalzadas para precisa subsistencia"*, karezko eta harri koskorrezko horma bat egin zuela, ....).


Zizurkilgo Udala

Juanita Tapiaren ezkontza-agurra (1925).


Zizurkilgo Udala

Josepa Ramona Alkorta (1931).


Zizurkilgo Udala

Patxi Tapia eta Inaxi Urkia ezkontza batean (1958).

XIX. mendearen amaieran, baserria bi etxebizitza banatutan bereizita zegoen: behe-solairuan bi sukalde eta ukuiluak; solairu nagusia eta sabaia zituen (1872).


Zizurkilgo Udala

Patxi Tapia eta Ignacia Urkia, Esperantza alabaren ezkontzan, gainerako anai-arrebekin batera: Jose, Manuel, Juli, Maria, Anttoni, Lurdes, Juanita, Axun, Josefina eta Xabina (1962).



Fatxada nagusiko bilbaduraren eta baoen xehetasuna (2008).

## Baserriaren jabeak:

Erretenbarrendi, Martin (1632 b.l.)
Beldarrain, Miguel & Goroa, Catalina (1632)
Beldarrain, Magdalena & Etxeberria, Juan Martinez (1684)
Etxeberria Otazu, Maria Luisa & San Millan, Juan Lopez (1703)
San Millan, Miguel Antonio & Ezeiza, Maria Josefa (1735)
San Millan, Maria Josefa & Ostolaza, Ignacio & Alzuru, Pedro (1767)
Sorarrain, Manuel Jose eta Pedro Jose (1792)
Sorarrain, Julian Antonio & Zatarain, Maria Jesus (1804 b.l.)
Sorarrain, Pedro Julian & Regillaga, Maria Josefa (1804)
Sorarrain, Martin Jose & Uzkudun, Micaela Josefa (1820)
Sorarrain, Josefa Gervasia, Mª Josefa, Domingo Mª, Joaquin Jose eta Manuela (1869)
Sorarrain, Francisco Maria (1880)
Sorarrain, Gregorio Jose (1886)
Zaldua, Josefa Joaquina (1897)
Aiestaran, Francisco Maria (1899)
Begiriztain, Jose Angel & Jauregi, Agustina (1900)
Begiriztain, Jose Angel eta Juan Martin (1914)
Begiriztain, Juan Martin & Segurola, Ramona Francisca (1955)
Begiriztain, Angel Carmelo (1957)
Tapia, Francisco & Urkia, Ignacia (1985)



Estalduraren sostengu-egitura, pilareek eta txarrantxek bizkarreko habeari eusten diotela (2008).



Patxi Otegi

Hegoaldeko Fatxada (1987).

## Etimologia

*Etxe* eta *be/pe* hitzek osatzen dute izena.

Joxin Azkue

**Baserriaren aztarnak desagertu baino lehen (2004).**

## Kokapena

Etzetamendi enklabean kokatuta zegoen.

Aiako udalerrian eta Andatza auzotik hurbil.

Zizurkilgo herrigunetik urrunen zegoen baserria zen.



Koordenatuak:
UTM: X: 572071; Y: 4788277; Z: 162
Geografikoak: Long.: -2º 6′ 44.3″; Lat.: 43º 14′ 5″; Alt.: 162


Joxin Azkue

Baserriaren hondakinak (2004).

## Deskribapena

Baserria desagertuta dago gaur egun. Hura zegoen tokian abereentzako pabiloi bat (artegia) eraiki da 2006an, eta aurreko eraikuntzen aztarna guztiak ezabatu ditu.

Antzinako argazkietan (2004) oraindik ere harri-horma batzuk ikus daitezke zutik, bai eta harlanduzko eskantzu batzuk ere, guztiak landarez estalita. Gainera, borda zahar bat ere ikus daiteke, bazka eta nekazaritza-lanabesak biltzeko eta geroago eskolatzat ere erabili zena.


Joxin Azkue

Baserriaren hondakinak (2004).

## Historia

Etxaberi buruzko lehen aipamen idatzia XVII. mendearen hasierakoa da, Zizurkilgo Kontzejuak hiribildu titulua eskuratzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserrien zerrendan: *"la casa de Echave"* (1618). Halere, aurreko mendearen amaieran *Echave* izeneko auzotar bat baino gehiago zeuden, eta beraz ziur aski ordurako eraikita zegoela pentsa daiteke. Etxabetarren familia izen bereko baserriari lotuta egon da belaunaldiz belaunaldi, XX. mendeko lehen hamarkadetara arte.

1719an, Francisco Etxabe txikia ezkontzen zela eta, orduan zeuzkan jabetzen zerrenda bat aurkeztu zen, ezkonsari moduan eraman baitzituen. 2 uztarri, 6 behor, 6 behi eta txahalak, 45 ardi, 6 txerri, 7 ohe eta haietarako oihalak, arropa gordetzeko 6 kutxa, lanabesak eta 2 sagardo kupel. 1892an etxearen inguruan bi eraikin zeudela jaso zen: teilape bat dolare batekin eta burdinazko prentsa batekin, eta teilatuz estalitako etxetxo bat, bazka eta nekazaritza-lanabesak gordetzeko.


Baserriaren kokalekuaren aireko argazki bat, 1954an. Behealdean Etxabesaletxe dago.

## Baserriaren jabeak:

Etxabe, Francisco & Agirresarobe, Maria (1655)
Etxabe, Francisco & Elizalde, María Francisca (1712)
Etxabe, Maria Josefa eta Etxabe, Sebastiana & Agirre, Martin (1742)
Etxabe, Miguel (1753)
Etxabe, Juan Antonio & Arrizabalaga, Josefa Ignacia (1858 b.l.)
Etxabe, Pedro Jose (1858)
Etxabe, Juan Antonio (1875 b.l.)
Etxabe, Pedro Juan & Elizalde, Dorotea (1875)
Etxabe, Jose Ignacio & Alberdi, Josefa Antonia (1892)
Etxabe, Maria Josefa & Arruti, Jose Maria (1928)
Arruti, Juan, Maria, Alejandro eta Martin (1955)

## Etimologia

*Etxe*, *be* eta *saletxe* (borda) hitzek osatzen dute. Baserri horren jatorriaren berri ematen digu izen horrek. Dokumentazioan, *Salechea de Echave* (1618) nahiz *Echave Salechea* (1752) ikus daitezke.

Joxin Azkue

## Kokapena

Etzetamendi enklabean kokatuta dago. Aiako udalerria eta Andatza auzotik hurbil.

Koordenatuak:
UTM: X: 572011; Y: 4788053; Z: 172
Geografikoak: Long.: -2º 6′ 47′′; Lat.: 43º 14′ 27.8′′; Alt.: 172




Baserriaren atzeko fatxada (2008).

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri neoklasikoa da. Oso traza bakuneko eraikina da; oinplano angeluzuzena dauka, kareorez estalitako harri-hormak, eta eskantzuetan eskuairatu gabeko harlandua. Baoak nahikoa erregulartasunez banatuta daude, baina horietako batzuk itxita daude gaur egun. Jatorrizkoek harlanduzko azpadura dute, baina adibide bat besterik ezin da ikusi, iparraldeko fatxadan. Barneko egitura oso bakuna da eta historian zehar egin dizkioten berritze-lanek aldatu egin dute. Karreren pisuari eusten dioten hainbat zurezko zutoinek osatzen dute. Zutoinak, berriz, elkarri mihiztatuta daude. Horietakoren bat mihiztatzeko txarrantxa bakanen bat ere erabili da.


Joxin Azkue
Baserriaren alboko fatxada (2006).

## Historia

Izenak berak ematen digu Etxabesaletxe baserriaren jatorriaren berri, hau da, geroago baserri bihurtu zuten abereentzako borda zaharra. XVII. menderako aldaketa hori eginda zegoen, Zizurkilgo Kontzejuak hiribildu titulua eskuratzeko behar zen dirua ordaintzen lagundu zuten baserrien zerrendan agertzen baita: *"la casa de Salechea de Echave"* (1618).

Izenak aditzera ematen digunez, inguruan zegoen eta gaur egun desagertuta dagoen Etxabe baserriarena zen borda, eta bien historiak paraleloan joan ziren: XVII. mendearen bigarren erdialdean jabeek saldu egin behar izan zuten, etxe nagusiak zituen zerga ugariei aurre egin ahal izateko. 1886an etxeak beheko solairua eta ganbara zituen, eta urte horretan Azpeitiko San Agustin komentuak (gaur egun desagertuta dago) Luis Garini saldu zion. Ziur aski ondoko urteetan Garinek goitik behera berritu zuen, gaur egun duen itxura hartu zuen arte.


Joxin Azkue
Baserriaren alboko fatxada (2006).

## Baserriaren jabeak:

Etxabe, Francisco & Agirresarobe, Maria (1655)
Etxabe, Francisco & Elizalde, María Francisca (1712)
Etxabe, Maria Josefa (1742) ½
Etxabe, Sebastiana & Agirre, Andres (1742) ½
Etxabe, Ignacio & Etxabe, Maria Ignacia & Irisarri, Maria (1746)
Etxabe, Maria Ascensia & Eguskiza, Miguel Antonio (1773)
Azpeitiko komentua (1855 b.l.)
Ogasun Ministerioa (1855)
Garin, Luis (1866)
Garin, Rufino (1906)
Egurtza, Pedro Joaquin & Eguskiza, Maria Dorotea (1906)
Egurtza, Maria Francisca (1906)
Egurtza, Pedro Joaquin & Eguskiza, Maria Dorotea (1915)
Egurtza, Jose Joaquin & Arruti, Ignacia (1915)
Egurtza, Juan Maria & Aristimuño, Maria (1966)
Egurtza, Aristimuño sendia

# 45. Etxeberria

## Etimologia

*Etxe* eta *berri* hitzek osatzen dute izena. Bi modutara uler liteke: etxe berria, edota eraiki berria. Dokumentazioak *Echeverria mayor* (1618) izena ematen dio, eta izen bereko etxe auzokidetik bereizteko xehetasun geografikoak erabiltzen ditu: *Echeverria de la parte de Aduna* (1687), *Echeverria de allende* (1740) edo, besterik gabe, *Echeverria de alla* (1752).

**Baserriaren jatorrizko kokapenaren ikuspegia (2010).**

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta zegoen. Zabalgune batean, Etxeberritxikia baserritik oso hurbil.



Koordenatuak:
UTM: X: 575949; Y: 4783529; Z: 125
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 54.7′′; Lat.: 43º 11′ 59.8′′; Alt.: 125



Joxin Azkue

Baserriaren kokapena. Ezkerrean Etxeberritxikia dago (2006)

## Deskribapena

Baserria gaur egun desagertuta dago. Hura zegoen tokian lorategi txiki bat dago, eta haren barruan propano-andel bat. Argazki zaharretan Etxeberritxikia baserritik metro gutxira zegoela ikusten da, baina 1990eko hamarkadan desagertuta zegoen.

## Historia

Etxeberria baserria XVI. mendearen hasieran aipatzen da dagoeneko, Joan Perez de Etxeberria eta haren koinataren, Maria Joaniz de Zufiaurreren, artean, baserriaren jabetzaren inguruko adiskidetasun-agiri bat ezarri zela eta. Hala eta guztiz ere, 1391n Miguel d'Echeverria izeneko auzotar bat bazegoela agertzen da dokumentazioan, Zizurkil Tolosarekin auzokidetzeko aktan parte hartzen. Ondorioz, garai horretarako baserria eraikita zegoela pentsa daiteke.



Inguruaren aireko argazki bat, baserria lurrera bota aurretik. Eskuineko baserria da. Goiko aldean Olatza dago (1954).

1740an Ignacio Galarragak baserrian maiorazkoa ezartzea erabaki zuen, *"deseando se conserven perpetuamente en el estado y libertad que al presente tienen y no se graven ni disminuyan, antes bien se aumenten y bayan en acrecentamiento"*. Manuel Bernardo Galarraga bere iloba izendatu zuen oinordeko. 1791n baserria Pedro Rekondo apaizari saldu zioten, eta berriztatzeari ekin zion berehala *("Echeverria su nuevo redificio"*, 1804). 1877an esaten zenez, eraikuntzak behesolairua eta bi solairu zituen, eta ziur aski horrela iraun zuen behin betiko lurrera bota zuten arte.

### Baserriaren jabeak:

Galarraga, Ignacio & Agirre, Ana Maria (1687)
Galarraga, Ignacio (1701)
Galarraga, Manuel Bernardo (1740)
Galarraga, Jose Vicente & Garaikoetxea, Maria Rosa (1791 b.l.)
Rekondo, Pedro (1791)
Galarraga, Maria Josefa eta Polonia (1804)
Rekondo, Pedro Luis & Ezeiza, Maria Francisca (1810)
Uzkudun, Antonio & Larrondobuno, Serafina (1810)
Uzkudun, Antonio Maria & Aristi, Maria Josefa & Ezeiza, Francisca ignacia (1844)
Uzkudun, Juan Antonio & Aranburu, Lorenza (1914)
Uzkudun, Maria Magdalena & Urdalleta, Eustakio (1931)
Urdalleta, Antonio Maria (1980 b.l.)
Urdalleta, Jose Toribio & Aristimuño, Ines (1980)
Sierra, Pedro & Arama, Rufina (1987)

# 46. Etxeberritxikia

## Etimologia

*Etxe*, berri eta *txiki* hitzek osatzen dute, inguruan zegoen izen bereko beste baserritik bereizteko. Dokumentazioak *Echeverria menor* (1618) izena ematen dio, edota izen bereko etxe auzokidetik bereizteko xehetasun geografikoak erabiltzen ditu: *Echeverria de la parte de la iglesia parroquial* (1687), *Echeverria onuzkoa* (1840) edo, besterik gabe, *Echeverria de aca* (1722).

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Zabalgune batean, desagertu den Etxeberria baserritik oso gertu.



Koordenatuak:
UTM: X: 575918; Y: 4783533; Z: 126
Geografikoak: Long.: -2° 3′ 56.1″; Lat.: 43° 11′ 59.9″; Alt.: 126


Fatxada nagusia (2010).

## Deskribapena

Baserria berrikitan berriztatu dute. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, gaur egungo materialez eginda, eta ez dauka aurreko eraikinaren ageriko aztarnarik. Barneko egituran soilik, zurezko zutiko batzuk eta beraien zapatak berreskuratu dituzte, frontalei eta petralei eusten, baina jatorrizko kokalekuaren testuingurutik kanpo.


Ekialdeko fatxada (2004).

Joxin Azkue

## Historia

Etxeberritxikiari buruzko lehen aipamen idatzia XVII. mendearen hasierakoa da, Zizurkilgo Kontzejuak hiribildu titulua eskuratzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserrien zerrendan: *"la casa de Echeverria menor"*. Oso litekeena da aurreko mendean eraikia izatea, baina momentuz ez dago ziurtasunik horren inguruan.

Baserriari buruz ditugun datuak ez dira ugariak, eta Juan Lopez Añorgaren eta beraren arreben artean familiaren legatuaren inguruan XVIII. mendearen erdialdean izan zen auzia nabarmentzen da horien artean. Auzi luzearen ondoren, Juan Lopezi esleitu zizkioten Etxeberritxikia eta Lizamuño baserriak, eta arrebei Mugiroberriko baserria. 1922 inguruan, etxea bi etxebizitza bereizitan banatu zen.

### Baserriaren jabeak:

Etxeberria, Juan Perez (1532)??
Etxeberria, Mari Joantxo & Etxabe, Joanes (1600)??
Etxeberria, Catalina (1623 b.l.)
Alzituri, Pedro & Etxeberria, Mariana (1623)
Alzituri, Magdalena & Añorga, Ascensio & Alkorta, Gracia (1665)
Añorga, Juan Lopez & Zaldua, Maria Rosa (1708)
Añorga, Juan Antonio & Ameztoi, Maria Ignacia (1743)
Añorga, Sebastian Jose (1782)
Añorga, Juan Ascensio & Ezeiza, Maria Ignacia (1804)
Añorga, Martin Antonio & Tejeria, Bernarda & Etxeberria, Maria Fermina (1836)
Añorga, Baltasar & Urrutia, Francisca Antonia (1840)
Añorga, Manuela & Martikorena, Jose (1899)
Urrutia, Francisca Antonia (1902)
Añorga, Claudia (1905)
Kortajarena, Blas Leonardo & Uharte, Rafaela (1922)
**Baserri ½**
Mendizabal, Jose Maria (1922)
**Baserri ½**
Mendizabal, Martin & Beloki, Eugenia (1922)
Mendizabal, Jose Maria & Alberdi, Maria (1931)
Larrarte, Andres & Iraola, Maria Antonia (1942)
Huegun, Francisca (1955)
Uria, Ascensio & Mora, Maria Rosario (1958)
Goia, Juan & Del Amo, Irene (1970)
Uria, Ascensio & Mora, Maria Rosario (1972)
Luengo Zubelzu sendia
Hernandez Zubelzu sendia

# 47. Etxeberritxo

## Etimologia

*Etxe* eta *berri* hitzek eta *-txo* atzizki txikigarriak osatzen dute izena. Dokumentazioan, *Casa nueba* (1768) edo *San Millan Echeverria* (1815) izenak agertzen dira, eta hortik eratorriko da gaur egungo izena.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta dago.
Sanmillan baserriaren alboan.




Koordenatuak:
UTM: X: 575273; Y: 4783613; Z: 118
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 24.6″; Lat.: 43º 12′ 2.7″, Alt.: 118

## Deskribapena

Baserri neoklasikoa da, baserri bilbaduradunen tipologiakoa. XVIII. mendearen lehen erdialdean eraiki zuten. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, kareztatutako harri-hormekin eta harlandua eskantzuetan eta jatorriko baoen azpaduretan.

Fatxada nagusian (hegoaldera) kareztaduraren azpian jatorriko zurezko bilbadura ikus daiteke, adreilu trinkozko itxiturarekin, argazki zaharren batean ere suma daitekeena. Gainera, estalduraren teilatu-hegaletako bat nabarmen ateratzen da eta jabaloiez eutsita dago.

Mendebaldean eranskin bat jarri diote, erdi-puntuko arku adobelatu batekin, eta San Millan baserriarekin partekatzen du bere mehelin-horma. 1885ean teilapea gisa definitu zuten eranskin hori.

## Historia

Etxeberritxo baserria eraikuntza berriko obra izan zen eta Joaquin Agirrek egin zuen XVIII. mendearen erdialdean, bere etxeko jauregiaren alboan zegoen lursail batean. Zehazki, 1759an, *"obras en la casa nueba que se hizo pegante al Palacio de San Milian"* aipatzen dira, 8.834 errealeko balioa zutela esanez. Ziur aski, etekinak handitzea zen eraikuntza berri horren helburua, etxalde zabalak areago ustiatzekotan.

Etxe hori alboko jauregitik bereizita ematen zen errentan. Halatan, 1815ean, maizterrak, Juan Bautista Bengoetxeak, urtero 24 gari-anega, 122 erreal eta 2 kapoi ematen zituen errentaren ordainetan.


Joxin Azkue

Baserriaren fatxada nagusia, bilbadura agerian uzten duen altxatua ere ikusten da (2004).


Bartolome Auzmendi

Baserriaren ikuspegi orokorra, Sanmillan baserriaren ondoan (hegoaldean) (1974).


Zizurkilgo Udala

Baserriaren fatxada nagusia (2000).

### Baserriaren jabeak:

Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1759)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Mendizabal, Ignacio & Beraza, Josefa Antonia (1885)
Mendizabal, Jose Maria & Argaia, Catalina (1918)
Mendizabal, Juana & Legarra, Juan Maria (1945)
Legarra Mendizabal sendia


Zizurkilgo Udala

Jose Maria Mendizabal eta Catalina Agirreren ezkontzako familia-argazkia (1921).


Zizurkilgo Udala

Ignacio Mendizabal, Josefa Antonia Beraza eta beraien seme-alabak: Epifania, Serapio, Josefa Agustina, Marcos, Maria, Juan Jose, Jose Maria eta Pedro Manuel (1885).

## Etimologia

*Etxe* hitzak eta *-txo* atzizki txikigarriak osatzen dute izena. Eskuarki *Echecho* izenez aipatzen da, eta batzuetan *Araeta Echecho* ere esaten zaio, harekiko mendekotasuna dela eta.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.

Izen bereko muinoaren hegalean.

Koordenatuak:
UTM: X: 575595; Y: 4784103; Z: 179
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 10.1″; Lat.: 43º 12′ 18.5″, Alt.: 179




Fatxada nagusia (2009).


Zizurkilgo Udala
Baserriaren kokapena (2000).

## Deskribapena

1998 urte inguruan baserria goitik behera berreraiki zen. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, gaur egungo materialez eginda, eta aurreko eraikinaren ageriko aztarnarik gabe.

## Historia

Ziur aski, Etxetxo baserria, jatorrian, hurbil dagoen Aretagoikoa baserriko abereentzako borda bat izan zen, eta *"Echecho azesoria"* etxea deitu zioten 1750ean. Ziur aski, XVII. mendearen bigarren erdialdean borda hori berreraiki eta baserri berri baten bihurtu zuten.

XX. mendearen erdialdean lurrera erorita ageri da eraikuntza, baina ez dakigu noiz utzi zuten behin betiko.

## Baserriaren jabeak:

Etxenagusia, Jose & Alkorta, Maria Ignacia (1699)
Etxenagusia, Alejandro & Etxeberria Otazu, Maria Luisa (1700)
Etxenagusia, Jose & Beldarrain, Salvadora (1746)
Etxenagusia, Juan Antonio & Arrastoa, Maria Josefa (1752)
Etxenagusia, Francisco Antonio (1790)
Etxenagusia, Juan Antonio (1792)
Etxenagusia, Jose Antonio (1855 b.l.)
Etxenagusia, Jose Domingo (1855)
Etxenagusia, Pedro Juan & Bengoetxea, Micaela (1905)
Etxenagusia, Pedro Angel & Tapia, Josefa Ramona (1936)
Etxenagusia, Jose Domingo (1952)
Gorostidi, Juan Maria & Etxenagusia, Idoia (1998)
Gorostidi Etxenagusia sendia

# 49. Etzeta

## Etimologia

Etimologia zaila du izenak, beharbada *izei* hitza eta *-eta* lekuzko atzizkia izan daitezke, baina ziurtasunik gabe. Eskuarki *Eceta* edo *Ezeta* izenez agertzen da.

## Kokapena

Etzetamendi enklabean kokatuta dago.

Aiako udalerria eta Andatza auzotik hurbil.

Hegal erdialdean, toki aldapatsu batean.



Koordenatuak:
UTM: X: 572129; Y: 4787806; Z: 193
Geografikoak: Long.: -2º 6′ 41.9′′; Lat.: 43º 14′ 19.7′′; Alt.: 193



Fatxada nagusia (2008).

## Deskribapena

Baserria berriki berriztatu dute. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, gaur egungo materialez eginda, eta aurreko eraikinaren ageriko aztarnarik gabe.

## Historia

Etzeta baserriari buruz ditugun datu zaharrenak 1746koak dira, baina pentsa dezakegu eraikuntza berria mende horren lehen erdialdean egin zutela, edota aurreko mendearen bukaera aldean asko jota. Aipatu dugun urtean, jabeak, Andres Agirrek, baserria berriztatzeko lanak egin zituen: (*"las obras y mexoras hechas …en la caseria de Ezeta"*).
Andresen semeak, Francisco Antonio Agirrek, 1772an baserria besterendu egin behar izan zuen, etxe horren gainean eta Arangaitz etxearen gainean zeuden zentsuko kargen ondoriozko 22.000 errealetik gorako zorrak kitatu ahal izateko.
1879 urtean honako hauek zituen etxeak: behe-solairua eta ganbara, bai eta lurpeko soto bat ere, lurraren aldapa naturala aprobetxatuz.



Joxin Azkue

Baserriaren kokapena (erdialdean) (2006).

### Baserriaren jabeak:

Agirre, Andres & Etxabe, Sebastiana (1746)
Agirre, Francisco Antonio & Roteta, Catalina Teresa (1763)
Etxabe, Lorenzo Antonio & Agirresarobe, Maria Josefa (1773)
Eguskiza, Miguel Antonio & Etxabe, Maria Ascensia (1773)
Eguskiza, Agustin (1822 b.l.)
Orbegozo, Juan Francisco (1822)
Olaskoaga, Jose Antonio & Legarra, Ana Maria (1824)
Olaskoaga, Donata & Arretegi, Jose Miguel (1881 b.l.)
Arretegi, Marcelina & Azkue, Luis (1881)
Azkue, Jose Maria & Irazusta, Concepcion (1925)
Arruti, Jose Antonio & Tolosa, Francisca (1928)
Arruti, Juan Maria & Lertxundi, Maria Carmen (1960)
Arruti, Jose Maria & Amilibia, Nerea (1994)

## Etimologia

*Fraile/Fraide* eta *soro* hitzek sortutako izena da, beharbada garairen batean lurra erakunde erlijiosoren batena izan zelako. Dokumentazioan *Fraidesoro* (1457) eta *Fraidisoro* (1618) izenak aipatzen dira.



**Ustezko baserriaren kokalekua ikuspegi orokorra (2009).**

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta zegoen.

Ez dakigu zehazki non egon zen baserria.

FRAISORO ?


Kutxa Fototeka

Baserriaren fatxada nagusia, lurrera bota aurretik (1895).

## Deskribapena

Baserria desagertuta dago gaur egun. Jatorrizko baserriaren 1895eko argazki bat baizik ez daukagu, eta bertan tamaina handiko eraikuntza ikus dezakegu. Oinplano angeluzuzeneko eraikina zen, kareztatutako harri-hormekin eta harlandua eskantzuetan eta baoen azpaduretan. Aurrealdean, abereek edaten zuten putzu edo urmael handi bat dago.




Belabietako batailaren planoa.
Bertan agertzen da baserria (1873).

## Historia

Fraisoro baserriaren erreferentzia historikoak XVI. mendearen erdialdekoak dira (1568). Dena dela, mende bat lehenago Juan de Fraydesoro izeneko auzotar baten berri daukagu, herrimendien erabileraren inguruan Kontzejuaren eta San Millango jaunaren artean sinatutako adiskidetze-agiri batean (1457).

1715ean, baserriko jabeek, Juan Zalduak eta Maria Miguel Larrañagak, maiorazkoa ezarri zuten jarauntsian, *"considerando los accidentes que se ofrecen de que muchas casas y aciendas principales a causa de gravarlas sus dueños y poseedores de censos y otras obligaciones se engenan …y que si fuesen de vinculo las tales casas y aciendas no llegarian a semejante estado y se conservarian"*.

1868an esaten zenez, une hartan baserriak behe-solairuan bi ukuilu zituen, sagardo-kupeletarako biltegia, ogi-labea, bi gela, sukaldea eta ataria; solairu nagusian bi etzaleku, bi gela, gurdietarako biltegia, dolareak eta aletegia, eta azkenik ganbara eta sabaia. Eraikuntza hori 1896an Foru Aldundiari eman zioten errentan, honako helburu honekin: *"establecer en ella un caserio-modelo que sirva de enseñanza práctica de la agricultura y ganaderia"*. Bi urte geroago Aldundiak erosi egin zuen. Hortik aurrera egin ziren lanek aurretiko baserria desagerrarazi zuten eta instalazio berriak ezarri zituzten.



GAO, JDIM. 2-7-105

Villabonatik Asteasu eta Zizurkilerako bideberriaren trazatuaren planoa (1781. urteakoa).

## Baserriaren jabeak:

Fraidesoro, Joanes (1568)
Larrondobuno, Juan Perez (1626)
Zaldua, Joan Perez (1633)
Zaldua, Joanes & Legarra, Catalina (1678 b.l.)
Zaldua, Joanes & Larrañaga, Maria Miguel (1678)
Zaldua, Pedro & Berrozpe, Isabel (1704)
Zaldua, Isabel & Lejaristi, Agustin (1715)
Lejaristi, Marcos Antonio & Barrenetxea, Micaela (1752)
Lejaristi, Jose Antonio & Zubimendi, Maria Micaela (1774)
Lejaristi, Juan Bautista & San Millan, Maria Isabel (1816 b.l.)
Lejaristi, Jose Ignacio & (1865)
Arreseigor, Pedro (1890)
Gipuzkoako Foru Aldundia (1898)

# 51. Galardi

## Etimologia

Badirudi *galar* hitzak eta -*di* lekuzko atzizkiak osatuta egon daitekeela: "egur hil asko dagoen lekua".

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Galardiko erreka eta Adunibarko erreka elkartzen diren tokitik gertu dagoen zapalda zabal batean.



Koordenatuak:
UTM: X: 576535; Y: 4783307; Z: 63
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 28.8′′; Lat.: 43º 11′ 52.3′′; Alt.: 63

## Deskribapena

XIX. mendeko baserri neoklasikoa da. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, kareztatutako harri-hormekin eta harlandua eskantzuetan. Baoen traza oso bakuna da, Hego-ekialdeko fatxadan daudenetan izan ezik, horiek zurezko leihoburua baitute.
Eraikuntza nagusiari eranskinak atxiki dizkiote eta ondorioz haren simetria hautsi egiten dute (Hego-mendebaldeko eta Ipar-mendebaldeko fatxadak).


Joxin Azkue

Iparraldeko fatxada (2005).


Patxi Otegi

Mendebaldeko fatxada (1987).

## Historia

Galardi baserriari buruzko lehen aipamenak XVI. mendearen amaierakoak dira (1584), baina data hori baino lehenago Ihoan Lopez de Galardy izeneko auzotar baten berri agertzen da Zizurkil Tolosa hiribilduarekin auzokidetzeko agirian. Ondorioz, orduarako baserria eraikita zegoela pentsa dezakegu.

XVII. mendearen amaieran baserria Lasarteko Brigidatarren Komentuari esleitu zitzaion, Teresa San Millanek, izen bereko etxaldearen jabeak, hartu zituen zorrak ordaintzeko. Mojek gobernatu zuten XIX. mendearen hasierara arte, eta une horretan Rafael Ortiz de Zarate eta Francisca Javiera Etxeberria oñatiarren alde besterendu behar izan zuten. Ziur aski, jabe berriek egin zituzten gaur egunera arte iraun duten berrikuntza-lanak.
1917an, inguruko igeltsu-hobiak ustiatzen zituen Aizpurua y Cia enpresak eskuratu zuen baserriaren eta lurren jabetza, eta ustiatzelan horiek duela gutxira arte iraun dute, berrikitan baserria esku partikularretara itzuli den arte.


Zizurkilgo Udala

Juan Bautista Ezeiza, baserri ondoko zelaian (1971).

Zizurkilgo Udala



**Jose Luis Ezeiza eta Ignacia Igarategi, ezkontza egunean (1921).**

Zizurkilgo Udala



**Ignacia Igarategi, etxeko atarian (1950).**

Zizurkilgo Udala



**Miren Maite, Juan Ignacio eta Mari Carmen Ezeiza (1975).**

Zizurkilgo Udala



**Juan Bautista Ezeiza eta Rosario Iñurrita, ezkontza egunean (1966).**



Hegoaldeko fatxada (2008).

## Baserriaren jabeak:

Idoiaga, Nicolas (1584)
Idoiaga, Francisca & Urdaneta, Gaspar (1603 b.l.)
Erroiz Galardi, Maria (1603 b.l.)
San Milllan, Juan Ruiz & Ugarriaraz, Maria Lopez (1603)
San Millan, Millan Ruiz & Okendo, Maria (1625 b.l.)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Okendo, Miguel Carlos & Etxeberri, Antonia Maria (1681)
Brigidatarren Komentua (Lasarte) (1681)
Ortiz de Zarate, Rafael & Etxeberria, Francisca Javiera (1820)
Ortiz de Zarate, Rafaela (1828)
Gaston, Javiera (1868)
Ortiz de Zarate, Rosario; Madinabeitia, Felisa (1916)
“Aizpurua y Cia.” (1917)
“Sociedad Comercial y Cooperativa Patronal de Consumo de Materiales de Construcción” (1919)
Ezeiza, Jose Luis & Igerategi, Ignacia; Ezeiza, Juan Bautista & Iñurrita, Rosario
Ezeiza Iñurrita sendia

# 52. Garaditxo

## Etimologia

*Garo* hitzak eta *-di* lekuzko atzizkiak osatzen dute izena. Dokumentazioan *Garadi* (1541) edo *Caracho* (1835) izena ematen diote baserriari.

**Ustezko baserriaren kokalekua ikuspegi orokorra (2010).**

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta zegoen.
Baserria zegoen tokian, familia bakarreko etxez osatutako urbanizazioa dago gaur egun.





**Lursaila, etxebizitzak eraiki zituztenean (2000).**



**Baserria zegoen inguruaren aireko argazkia (1954), Ihartza eta Pagamuño artean.**

## Deskribapena

Baserria gaur egun desagertuta dago. Ez dakigu zehatz non zegoen, XX. mendearen erdialdean guztiz desagertuta zegoenez, ez baitago hori adieraziko duen inolako eraikuntza-aztarnarik. Hura zegoen tokian etxebizitza-multzo bat eraiki dute (1995).

## Historia

Garaditxo baserriari buruzko lehen aipamen idatzia XVII. mendearen hasierakoa da, Zizurkilgo Kontzejuak hiribildu titulua eskuratzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserrien zerrendan: *"la casa de Garadicho"* (1618). Aurretik, 1541ean, dokumentazioak Caterina de Garadi izeneko auzotar bat aipatzen du, eta beraz pentsa daiteke garai hartan baserria eraikita zegoela.

1731n, jabeak, Martin Igartza billabonatarrak, berriztatze-lan handiak egin zituen barneko egituran. 1850ean baserriak sutea jasan eta guztiz kiskalita gelditu zen, eta geroago berreraiki egin zuten. Halere, ez du gaur arte iraun. Eraikin berriak behe-solairua, solairu nagusia eta sabaia zituen (1911) baina ez dakigu noiz utzi zuten behin-betiko eta noiz desagertu zen.

### Baserriaren jabeak:

Ihartza, Martin & Iturribide, Maria Magdalena (1731)
Larrasoain, Manuel & Narbarte, Catalina (1743)
Larragoiena, Manuel (1761 b.l.)
Mariñelarena, Manuela (1761)
Lardizabal, Manuel (1835)
Lardizabal, Manuela & Mendizabal, Francisco Sales (1850 b.l.)
Jugo, Dolores & La Torre, Manuel (1850)
Castillo de la Torre, Pilar & Covarrubias, Andres (1900)
Covarrubias, Andres eta Maria Concepcion (1958)
Lasarte, Jose Maria; Goñi, Jose Maria; Llarena, Martin (1965)
Lasarte, Ignacio; Kortajarena, Jose Francisco (1966)

# 53. Garetza

## Etimologia

*Garo* hitzak eta *-tza* ugaritasun-atzizkiak osatzen dute. Eskuarki, aipamen zaharrenetan *Gareça* izenez (1547) eta aipamen berrietan *Gareza* izenez agertzen da.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Etxetxo muinopean, hegalaren erdialdean.




Koordenatuak:
UTM: X: 575286; Y: 4784220; Z: 198
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 23.8″; Lat.: 43º 12′ 22.4″, Alt.: 198

Fatxada nagusia (2009).

## Deskribapena

Baserria berriki berriztatu dute. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eta gaur egungo materialez eginda dago. Ekialdeko eta Hegoaldeko fatxadetan bi eranskin ezarri zaizkio. Eraikinaren barnealdea ere guztiz berriztatuta dago, eta bi zutabe baizik ez ditu mantentzen behe-solairuan, baina testuingurutik kanpo.

## Historia

Garetza baserriari buruzko lehen aipamen idatzia 1575ekoa da, jabea Joanes Gareza zen garaikoa. Dena dela, urte batzuk lehenago Joanes de Gareça izeneko auzotar bati buruzko erreferentziak ditugu (1547), eta beraz une historiko horretan baserria bazegoela pentsa dezakegu.
Geroagoko datuek ez dute ia inolako garrantzirik, baina badakigu XIX. mendearen hasieran maizterrek urtero 11 gari-anega eta 240 erreal ordaintzen zituztela errentaren truke.

1879an honako hauek zituen: behe-solairua eta goiko solairu bat. Hain zuzen, solairu horixe iritsi da ia gaur egun arte, guztiz berriztatu duten arte.



Joxin Azkue

Atzeko fatxada (2005).

Zizurkilgo Udala



Antonio Kortajarenaren eta Maria Jesus Arrutiren ezkontza, emaztearen gurasoekin (1967).

Zizurkilgo Udala



Jose Luis Kortajarena soldadutzan (lehen lerroan, ezkerrean) (1945).

Zizurkilgo Udala



Lagun taldea. Erdian, eserita, Antonio Kortajarena (1926).




Zizurkilgo Udala

Jose Luis eta Carmen Kortajarena anai-arrebak, ezkontza batean (1965).

## Baserriaren jabeak:

Gareza, Joanes (1547)
Garagorri, Ignacio (1752)
Garagorri, Jose & Mujika, Marcelina (1805)
Garagorri, Jose Luis & Goenaga, María Pilar (1843 b.l.)
Mujika, Marcelina (1843)
Garagorri, Jose Luis & Goenaga, María Pilar (1861 b.l.)
Garagorri, Crisostomo (1861)
Goenaga, María Pilar (1878)
Larrarte, Jose Ignacio & Usandizaga, Maria Angela (1879)
Larrarte, Juan Jose & Zaldua, Ramona (1884)
Kortajarena, Juan Bautista & Otegi, Josefa Angela (1918)
Kortajarena, Cayetano & Kortajarena, Teresa (1923)
Kortajarena, Antonio Maria & Arruti, Maria Jesus (1936)
Kortajarena Arruti sendia

## Etimologia

*Garo* eta *mendi* hitzek osatzen dute. Jatorrian, izen horren luzaera osoan aipatuta agertzen da: *Garmendia*.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Muino txiki baten gainean, ikuspegi handiko tokian.




Koordenatuak:
UTM: X: 574671; Y: 4784310; Z: 158
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 50.9′′; Lat.: 43º 12′ 25.5′′, Alt.: 158

## Deskribapena

Baserria berriki berriztatu dute. Oinplano angeluzuzeneko eraikina zen, kareztatutako harri-hormekin eta harlandua eskantzuetan. Baoak erregularrak eta bakunak dira. Fatxada nagusiko hormapikoa ere adreiluz itxi dute. Perimetroan zehar atxikitako hainbat eraikin erantsi zaizkio, eta ondorioz oinplanoak itxura asimetrikoa dauka. Barneko egitura ere goitik behera berriztatuta dago.



Patxi Otegi

**Baserriaren kokapena (1987).**



Bartolome Auzmendi

**Baserria, bailararen hondotik ikusita (1974).**



Zizurkilgo Udala

**Baserriaren fatxada nagusia, berriztatu aurretik (1945).**

## Historia

Garmendi baserriaren jatorria auzoko Andrezketa baserrian dago, XVII. mendearen bigarren erdialdean, uneren batean, bertako jabeek euren lurretan etxe berri bat eraikitzea erabaki baitzuten. Etxe horri Garmendia edo Garmendi deitu zitzaion, eta familiaren diru-sarrerak handitzea eta etxaldea areago ustiatzea zuten helburu.



Zizurkilgo Udala



Zizurkilgo Udala

**Jose Joaquin Goenaga eta Juliana Zubeldia (1946).**



Zizurkilgo Udala

**Jose Goenaga eta Kontxi Goenaga, baserriaren aurrean (1960).**



Zizurkilgo Udala

**Bernardo eta Manoli Goenaga anai-arrebak (1971).**

## Baserriaren jabeak:

Izagirre Andrezketa, Francisco & Larrarte, Luisa (1692 b.l.)
Izagirre Andrezketa, Juan & Aizpea, Teresa (1692)
Izagirre Andrezketa, Maria Francisca & Larrondobuno, Juan Manuel (1731)
Larrondobuno, Juan Ignacio & Etxabeguren, Mariana (1751)
Leturiondo, Francisco Ignacio & Lamariano, Francisca Ignacia (1764)
Leturiondo, Antonio & Olaeta, Maria Concepcion (1775)
Leturiondo, Jose Maria & Berroeta, Josefa Joaquina (1806)
Leturiondo, Jose Jeronimo & Iturriaga, Maria Bernarda (1832)
Leturiondo, Maria Bernarda & Arribillaga, Jose Antonio (1845)
Arribillaga, Josefa Jeronima & Zelaia, Victoriano (1911)
Goenaga, Jose Joaquin & Zubeldia, Juliana (1913)
Goenaga, Bernardo & Imaz, Milagros (1953)
Iza Olaizola sendia

## Etimologia

*Goiko* eta *etxe* hitzek osatzen dute.

Joxin Azkue

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Ezkeltzu mendiko hegalaren erdialdeko zapalda batean.




Koordenatuak:
UTM: X: 575021; Y: 4786485; Z: 316
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 34.4″; Lat.: 43º 13′ 35.9″; Alt.: 316


Joxin Azkue

Baserriaren hondakinak (2006).

## Deskribapena

Gaur egun baserria guztiz aurrituta dago. Argazki zaharretan (2006) harri-horma batzuk nabari ditzakegu, landaretzak guztiz hartuta.

## Historia

Goikoetxea baserriaren historia oso laburra da. Jatorria XIX. mendearen hasieran dago, Jose Ibarbia eta Maria Josefa Elolak Goikoetxea izeneko etxea eraiki zutenean (*"construyeron una casa que se llama Goycoechea donde havitan"*) Udalak Independentziako Gerran erositako lursail batean (1835). 1865ean agertzen zenez, etxe horrek gutxienez behe-solairua eta solairu bat zeuzkan.

Mende bat eskas geroago, 1915ean, aurritutako baserria eta biziezina zela agertzen zen (*"caseria en ruinas e inhabitable"*), eta ez zen berriro eraiki.


Joxin Azkue

Mendebaldeko fatxada (2006).

### Baserriaren jabeak:

Ibarbia, Jose & Elola, Maria Josefa (1835 b.l.)
Ibarbia, Lucas Antonio & Iturralde, Ana Josefa (1835)
Ibarbia, Antonio Maria & Irazu, Maria Tomasa (1868)
Ibarbia, Juan Jose, Jose Maria, Clementina, Manuela, Josefa Ignacia, Micaela Antonia, Juan Antonio eta Meliton (1907)
Atxaga, Juan Pedro & Makuso, Jeronima (1923)
Atxaga, Jose Jacinto & Tapia, Maria Asuncion (1968 b.l.)
Atxaga, Jose Ignacio, Francisco Maria, Manuel eta Maria Jesus (1968)
Zubizarreta, Bernardo; Unanue, Juan (1978)

# 56. Gurutzeta

## Etimologia

*Gurutz/gurutze* hitzak eta *-eta* lekuzko atzizkiak osatzen dute izena. Dokumentazioan *Guruceta* izena ematen zaio.

Joxin Azkue

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Urkamendi muinoaren hegalaren erdialdeko zapalda batean.




Koordenatuak:
UTM: X: 576028; Y: 4783107; Z: 154
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 51.4″; Lat.: 43º 11′ 46.1″; Alt.: 154


Joxin Azkue

Atzeko fatxada (2005).

## Deskribapena

Baserria guztiz berriztatuta dago 1995eko urtean eta bizitzeko etxe bihurtu dute. Oinplano zuzeneko eraikina da, gaur egungo materialez eginda, eta ez du aurreko eraikuntzaren aztarna fisikorik mantentzen.

## Historia

Gurutzeta baserria Francisco Ignacio Etxeberriak eraiki zuen XIX. mendearen hasieran, eta 1828ko dokumentuetan agertzen da dagoeneko: *"construida á sus espensas por dicho Echeverria en terrenos que compro a la Noble Villa"*. Urte batzuk geroago jabeek saldu egin behar izan zuten, enbargo judizialaren mehatxupean.

XX. mendearen hasieran, eraikuntza aurrituta ageri da, eta 1922an honela definitzen dute: *"solar de la casa quemada llamada Guruceta …que solo estan algunas ruinas de paredes aisladas"*. Hortik aurrera baserria ez zen berriz eraiki, duela hamarkada batzuk egin ziren lanak egin arte.


Zizurkilgo Udala

Fatxada nagusia (2000)

### Baserriaren jabeak:

Etxeberria, Francisco Ignacio & Arroki, Mariana (1828)
Iguain, Juan Fermin (1842)
Guibert, Pedro Luis (1842)
Eraso, Pedro Jose (1867)
Trifon, Bonifacio (1873)
Eraso, Elvira eta Pedro (1922)
Intxausti, Hilario & Lasa, Pilar (1995 b.l.)
Goikoetxea, Juan & Arana, Maria Carmen (1995)
Goikoetxea Arana sendia

# 57. Ihartza

## Etimologia

Dirudienez, izena *ihar* izena (astigarra edo toki idorra, zimela) eta ugaritasuna adierazten duen –*tza* atzizkia elkartzetik dator. Agirietan, zenbait modutan aipatzen dute eraikin hau, baina bi izen hauek dira erabilienak: *Yarça* (1391) eta *Ygarza* (1618).

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Ikusmira zabaleko zelaigune txiki batean, eta eraikuntza berriko eraikinez inguratuta dago.




Koordenatuak:
UTM: X: 576592; Y: 4783083; Z: 75
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 26.4″; Lat.: 43º 11′ 45″; Alt.: 75



**Baserriaren atzeko fatxada (2008).**

## Deskribapena

Baserri barrokoa da, armazoidun baserrien tipologiakoa, XVII. mendearen lehen erdian edo XVIII. mendearen hasieran eraikia. Bolumen handiko eraikin honek oinplano karratua du, harri-horma zurituak, eta harlandua eskantzuetan. Gaur egun, zenbait etxebizitzatan banatuta dago, eta horrek zaildu egiten du eraikin osoaren nondik-norakoa ulertzea. Gainera, banaketa horrek nabarmen hondatu du baserriaren irudia.

Eraikinaren habeartea oraintsu berreraiki da osorik, material modernoak erabilita, eta jatorriz ataripea zen espazioa erabili da, bai eta sarreran zuen dobelazko arku erdizirkularra ere. Giltzarriaren gainean, harrian landutako armarri bat du.

Gainerako eraikinean, hainbat berrikuntza eta eranskin ikusten dira, eta horrek izugarri zailtzen du hondakinak interpretatzea. Jatorrizko baoetan harlanduzko azpadurek diraute, oraindik ere, nahiz eta azpadura horietakoren bat edo beste geroagoko beste batzuek (ekialdeko fatxadan pilatuak) moztuta edo estalita dagoen. Gainerakoa ez da batere interesgarria, eta guztiz desordenatuta dago zabalduta. Fatxada nagusiko (ekialdekoa) iparraldeko habeartean, sarrera bat egokitu da lehen solairuan, harmailadi baten bidez, bai eta balkoi luze txiki bat ere, biak material modernoz eraikiak.

Eraikinaren barne-egiturak kanpoaldean ikusitako arazo berak ditu, aparteko zenbait etxebizitza-lotetan banantzearen eraginez. Dirudienez, jatorriz hainbat pilarez osatuta egongo zen, eta pilare horiek aho-zirikako mihiztadurako besoak eta ziriak zituzten, kontragoihabeen pisuari eusteko. Nolanahi ere, barne-egitura eraikinaren erdialdeko habeartean soilik ikus daiteke, bere horretan iraun duen bakarra baita. Teilatupeko solairuan ikusten da zer ezaugarri dituen eraikinaren jatorrizko itxiturak: zurezko armazoia, adreilu trinkoz itxia. Gaur egun, kareztadurak estalita dago.


Zurezko armazoia eta karezko geruzak estalitako adreilua (2008).



Aurreko fatxada, eraberritu aurretik (1987).

## Historia

Ihartza baserria udalerriko jatorrizko 21 oinetxeetako bat zen eta, beraz, armarri heraldikoa izateko eskubidea zuen. Baserriaren idatzizko lehen aipamena berantiar samarra da, XVII. mende hasierakoa (1618); baina jada 1391ean, Martin Yvannez d'Iarça izeneko pertsona baten aipamena ageri da, Zizurkildarrak Tolosako hiribilduko herritar bihurtzeko aktan parte hartu baitzuen.

Basetxe horrek hainbat jabego zuen inguruan, eta 1690etik aurrera izen bereko maiorazkoaren zati bilakatu zen, Jose Galarragaren azken borondatearen arabera, *"destinado a prorrogar y conserbar la familia y en ella la memoria y renombre de dicha cassa de Ygarza que es solar infanzona de notorios hijosdalgos de sangre"*. Haren oinordekoek beste jabego batzuk erantsi zizkioten maiorazko horri (Beldarrain oinetxea, Billabonako Amallo eta Chominar oinetxeak…).

Jatorrizko eraikinak ez du iraun gaur egun arte, eta iraun duten barne-egiturako hondakin apurrak XVIII. mende hasierakoak dira. Une horretan, Joaquin Beldarrainek goitik behera berritu zuen (1708). Geroago, eta batez ere XX. mendean zehar, eraikina behin eta berriz zatitu zen barrutik, baina horrek ez zuen gehiago hondatu: 1933an etxea bi lotetan zatitu zen, eta 1959an, berriz tokibanatu zen iparraldeko erdia.


Beheko solairuko pilarea, habeei eusteko bere beso eta guzti (2008).

## Baserriaren jabeak:

Galarraga, Bartolome & Arizmendi, Maria
Galarraga, Josefo & Beldarrain, Mariana (1690 b.l.)
Beldarrain, Joaquin & Etxeondo, Luisa (1690)
Beldarrain, Antonio Joaquin & Zubeldia, Maria Ignacia (1748)
Beldarrain, Ignacia Joaquina & Lizarraga, Miguel Antonio (1782)
Lizarraga, Joaquin Ignacio & Urkidi, Ana Josefa (1814)
Lizarraga, Valentin & Urroz, Maria Francisca (1857 b.l.)
Lizarraga, Miguel Joaquin & Ibarrolaburu, Marcelina (1857)
Lizarraga, Pedro Juan & Goenaga, Maria (1862)
Añorga, Manuel Maria & Franconi, Josefa Ignacia (1886)
Añorga, Maria Martina eta Pia Francisca (1901)
Hegoaldeko ½
Arruti, Ignacio Maria & Elizegi, Casilda (1933)
Arruti, Josefa Francisca & Iturbe (1952)
Iturbe, Juan Jose (2000)
Iturbe Aginaga sendia
Iparraldeko ½
Usabiaga, Isidro & Jaunzasoro, Bibiana (1933)
Galartza, Jose; Peña, Juan (1955)
Jabekideak (1959)



**Fatxada nagusiko baoetako harlanduzko azpaduren xehetasuna (2008).**

# 58. Illarratxoeta

## Etimologia

Izena *Illarra/Iñara* (txilarra) izenak, *–txo* atzizki txikigarriak eta *–eta* lokatiboak osatzen dute. Hasieran (1823), baserria aipatzeko *Aizpurua Yllarrachoeta* izena erabili zen, eraikitzailearen abizenari erreferentzia eginez; edo bestela, *Yllarrachueta* aldaera (1843).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Erramaitz gainaren eta Zarateko haitzaren artean.




Koordenatuak:
UTM: X: 573749; Y: 4785847; Z: 322
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 31″; Lat.: 43º 13′ 15.7″; Alt.: 322


Patxi Otegi
Baserriaren egoera hondatu baino lehen (1987).

## Deskribapena

Gaur egun erortzeko zorian dago. Inguruan, harri-hormen zati isolatu batzuk baino ez dira ageri. Antzinako argazkien arabera, eraikinak oso diseinu soila zuen.

## Historia

Illarratxoeta baserria Juan Antonio Aizpuruak eraiki zuen 1814an, lehenago udaletik eskuratutako onibar baten gainean (*"y deseando redificar en ella casa de avitacion"*). Handik gutxira, baserriaren jabeak etxaldearen erdia saldu behar izan zion Juan Antonio Elola auzokideari, zituen zor ugariak kitatzeko. Bi jabeen arteko bizikidetza ez zen oso baketsua izan, eta hurrengo urteetan, hainbat auzi izan zituzten bien artean, etxeari atxikitako zenbait sororen jabetza erabakitzeko.

Eraikinaren historia 1846 inguruan eten zen, halabeharrezko sute batek nabarmen kaltetu baitzuen. Berriz eraiki behar izan zen. Eraikin berriak lehen solairua, solairu nagusia eta ganbara zituen, eta bi aldeak mehelin-horma batek banantzen zituen (1871). 1984an, eraikina jada erortzeko zorian zegoen, eta denborak aurrera egin ahala, gero eta gehiago hondatuz joan da, gaur egungo egoerara iritsi arte.


Joxin Azkue
Baserriaren hondakinak (2006).


Baserriaren hondakinak (2009)

### Baserriaren jabeak:

Aizpurua, Juan Antonio & Artola, Maria Salvadora (1818)
<u>Iparraldeko ½</u>
Aizpurua, Juan Antonio & Artola, Maria Salvadora (1823)
Aizpurua, Francisco Antonio & Aranalde, Maria Andresa (1850)
Aizpurua, Antonio Maria & Pagola, Maria Josefa (1890)
Aizpurua, Micaela & Diaz, Jose (1907)
Artola, Juan Luis & Pagola, Juana (1930)
Goenaga, Bernardo & Imaz, Milagros (1955)
<u>Hegoaldeko ½</u>
Elola, Jose Antonio & Artola, Maria Josefa (1823)
Elola, Josefa & Garmendia, Felipe (1853)
Goenaga, Juan Tomas & Aizpurua, Ana (1893)
Goenaga, Jose Joaquin & Zubeldia, Juliana (1913)
Goenaga, Bernardo & Imaz, Milagros (1961)
Goenaga, Bernardo & Imaz, Milagros (1955/1961)
Huizi, Manuel & Hernandez, Marcelina (1984)
Sorarrain, Miguel & Kortajarena, Maria Jesus (1985)
Zizurkilgo Udala (1993)

# 59. Ipidegi

## Etimologia

Ez dago batere argi zein den izenaren etimologia.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Ibarraren sakonean, Zarateko
Bentatik ez oso urruti.




Koordenatuak:
UTM: X: 573829, Y: 4786295; Z: 338
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 27.3′′; Lat.: 43º 13′ 30.2′′; Alt.: 338



**Baserriaren hondakinak (2009). Eskuinaldean, ogi-labearen hondakinak ikusten dira.**

## Deskribapena

Gaur egun erortzeko zorian eta landaretzak hartuta dago. Antzinako argazkietan ikus daitekeenez, oinplano angeluzuzena, bistako harri-hormak eta harlanduz egindako eskantzuak zituen. Dirudienez, baoek zurezko ateburu eta leihoburu soilak zituzten. Hormataletako batean, adreilu trinkoz egindako antzinako ogi-labe baten hondakinak ikusten dira, eta jada galdu du kanpoko egitura guztia.

Baserritik hurbil karobi bat dago, orain ere egoera onean. Frantziar-erakoa da: elikatzeko sarbidea behealdean du, eta kargatzeko sarbidea, berriz, goialdean.



**Baserriaren hondakinak (2009).**

## Historia

Ipidegi baserriaren jatorria ez da oso aspaldikoa. Dirudienez, Jose Gabriel Zarauzek eraiki zuen, XIX. mendeko lehen erdiko uneren batean. 1865ean, eraikinak zati hauek zituen: beheko solairua, sukaldea, logela bat eta ukuilu bat zituena; solairu nagusia, bi logela zituena; eta ganbara. Eraikina 1960-1970 hamarkadaren inguruan utzi zuten, nonbait, abandonatuta.



**Baserriaren ondoko karobia (2009).**

## Baserriaren jabeak:

Zarauz, Jose Gabriel & & Iñarra, Ignacia Antonia (1856 b.l.)
Zarauz, Josefa Francisca & Urkia, Miguel Joaquin (1856)
Zarauz, Maria Josefa (1904)
Argaia, Juan Bautista & Goioetxea, Juana Josefa (1912)
Argaia, Miguel Domingo & Altuna, Maria (1932)
Argaia, Juan Bautista (1959)

# 60. Iragorri

## Etimologia

Baliteke *illarra/iñarra* (txilarra) eta *gorri* adjektiboa elkartuz sortutako izena izatea. Jatorrizko izena *Irarragorri* zen, baina geroago *Ydaragorri* (1860) eta *Yllarragorri* (1879) bilakatu zen.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Herrigunetik hurbil dago, mendi-hegalaren erdialdeko zelaigune batean, eta ikuspegi zabala du.



Koordenatuak:
UTM: X: 575134; Y: 4783717; Z: 128
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 30.7″; Lat.: 43º 12′ 6.1″; Alt.: 128

## Deskribapena

Baserri gotiko-errenazentista da, dolaretxe-erakoa, XVI. mendean edo XVII. mendearen lehen erdian eraikia. Eraikin handia da, oinplano angeluzuzenekoa. Ekialdeko erdian kareztatutako harrihormak ditu, eta beste erdian, berriz, bistako adreilua. Harlanduzko eskantzuak ere baditu. Gaur egun, aparteko bi etxebizitzatan bananduta dago, eta horrek jatorrizko egitura desitxuratzea eragin du.

Eraikinaren ekialdeko erdia da ondoen kontserbatuta dagoena, dirudienez. Fatxada nagusia (ekialdekoa) oso homogeneoa du, bao gehienek harlanduzko azpadurak dituzte, eta gainerakoak ez du garrantzirik. Hegoaldean, teilape handi bat du erantsita, bihitegitarako erabilia, harlanduzko harri-horma sendo baten gainean zurkaiztua, maldaren koska handia gainditzeko; geroago, zementuzko zutoinen bidez handitu da.

Paisajes Españoles



**Baserriaren airetiko ikuspegia.**

Joxin Azkue



**Baserriaren hegoaldeko fatxada (2005).**

Beste erdia, mendebaldekoa, ez dago hain ongi kontserbatuta. Iparraldeko fatxadan, mendebaldean dagoen baoa aipatu behar da, hareharrizko harlanduzko ate-zango nahiz leiho-zangoak eta zurezko ateburu nahiz leihoburuak baititu. Uneren batean, eraikina handitu egin zuten mendebaldetik, zabalera gutxiagoko beste gorputz bat erantsita. Bertan, bao bat dago beheko solairuan, eta arku erdizirkularreko sarbide bat, gaur egun estalita dagoen harlanduzko azpadura batez inguratuta. Geroagoko uneren batean, neurri txikiagoko gorputz bat erantsi zitzaion, eta gaur egun erortzeko zorian dago. Hegoaldeko fatxadaren kontra, beste erdia deskribatzean aipatutako teilapea luzatzen da, eta bestaldeko zatiaren ezaugarri berak ditu.

Eraikinaren jatorrizko barne-egitura egoera onean dago, beheko solairua izan ezik; solairu horretan, hormigoiz ordezkatu da jatorrizko egitura. Dirudienez, zurezko pilareak zituen, eta haien gainean, hainbat habe zeuden etzanda, pilareei urkila-formako mihiztaduraz edo aho-zirikako mihiztaduraz lotuta. Jatorriz, bi fatxada nagusiek zurezko armazoia zuten, baina gaur egun estalita daude, bai karez (ekialdeko fatxadan) bai handitu egin delako (mendebaldekoan). Lehen fatxada horretan, alderantzizko urkilaren itxurako jatorrizko zutoina ikus daiteke estaldura azpian, oraindik ere, goihabeari eusten. Egitura horren elementurik bereziena antzinako sagardo-dolarearen lau pilareak dira, eta ongi kontserbatu dira, nahiz eta goialdean baino ez dauden ikusgai.



**Teilatupean ongi kontserbatuta dagoen antzinako dolarearen pilareetako bat (2008).**

## Historia

Iragorri baserriari buruzko lehen datu historikoak XVI. mende amaierakoak dira (1590). Edonola ere, Ihoan de Yrarragorri izeneko auzotar baten aipamena ageri da, jada 1391. urteko akta batean, Zizurkildarrak Tolosako hiribilduko herritar bihurtzeko aktan parte hartu baitzuen. Beraz, baliteke ordurako eraikia izatea.

1717an, Martin Irarragorri kapitainak eta Sebastiana Larrondobunok beren jabetzako ondasunak batuta maiorazko bat sortzea adostu zuten, beren arbasoen oroitzapenari iraunarazteko eta beren ondasunak banaezinak izan zitezen. Maiorazkoa ondasun hauek osatzen zuten: Iragorri eta Arandabarro basetxeak, eta ganaduarentzako txabola bat, geroago basetxe bilakatuko zena (Abeletxe).

Jatorrizko eraikinak hainbat aldaketa eta berrikuntza izan zituen historian zehar. Berrikuntzarik handiena 1916. urtean izan zen, Juan Miguel eta Juan Francisco Barriola anaiek eraikina aparteko bi etxebizitzatan banandu baitzuten, eta bi zatiak tokibanatzeko beste mehelin-horma bat eraiki.

Zizurkilgo Udala



Manuel Arruti eta Juana Josefa Barriolaren arteko ezkontzaren eguneko argazkia. Atzealdean, azken horren neba Ignacio eta Anttoni Barriola ageri dira (1943).

Zizurkilgo Udala



Maria Jesus eta Juana Mari Arruti ahizpak, ezkontza batetik irten berritan (1960).

Zizurkilgo Udala



Manuel Arruti, Maria Jesus eta Juana Mari alabekin (1948).



Zizurkilgo Udala

Juan Miguel Barriola eta Ignacia Zeberio, baserriaren aurrean, haien seme-alabak diren Juan Bautista, Anttoni, Juliana, Juana Josefa eta Inixiorekin (1945).

## Baserriaren jabeak:

Iraragorri, Juanes eta Maria Juanes (1590)
Irarragorri, Martin (1670)
Iraragorri, Juan Perez & Sarobe, Francisca (1690 b.l.)
Etxeberria Iraragorri, Juan & Agirre, Isabela (1690)
Irarragorri, Martin & Larrondobuno, Sebastiana (1696)
Barriola, Juan Perez & Garagaza, Ana Maria (1749)
Barriola, Francisco Antonio & Ostolaza, Maria Salvadora (1761)
Barriola, Juan Perez & Ameztoi, Juana Bautista (1796)
Barriola, Francisco Maria & Arregi, Micaela Josefa (1823)
Barriola, Jose Domingo & Irazu, Micaela Antonia (1860)

**Mendebaldeko ½**

Barriola, Juan Francisco & Legarra, Juana (1915)
Barriola, Pedro & Lertxundi, Cristina (1931)
Barriola, Maria Arantzazu (1968)
Barriola Lertxundi sendia (1968)

**Ekialdeko ½**

Barriola, Juan Miguel & Zeberio, Ignacia (1915)
Barriola, Juana Josefa & Arruti, Manuel (1979)
Arruti, Victorio
Arruti Barriola sendia

# 61. Iraola

## Etimologia

Batetik *irazu* (iratzea) eta bestetik *ola* (lantokia) hitzak elkartuta osatzen da. Historian zehar, *Irola* izena aipatu izan da (1391), eta hortik eratorriko zen gaur egungo izena. Nolanahi ere, Iola izenez da ezaguna.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Zelaigune zabal batean, mendi-hegalaren erdialdean, ikuspegi handiko toki batean.

Koordenatuak:
UTM: X: 575869; Y: 4783896; Z: 132
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 58.1″; Lat.: 43º 12′ 11.7″; Alt.: 132





Baserriaren fatxada nagusia (2009)

## Deskribapena

Harri-hormazko eta zurezko egiturazko baserria, XIX. mendean eraikia. Oinplano angeluzuzena du, harri-horma zurituak eta harlanduzko eskantzuak. Baoek ez dute garrantzi handirik (zurezko azpadura dute), eta erregularki banatuta daude.

Eraikinaren atzealdean, egoera onean kontserbatzen da oraindik *perratoki* baten egitura, teilape baten azpian.

Eraikinaren barrualdean, jatorrizko egitura guztia eraikuntzako material modernoekin ordezkatu da lehen bi solairuetan, eta teilatupean soilik kontserbatzen da. Jatorrizko egitura horrek oso egitura soila du: txineladun zutikoez osatuta dago, eta petralak txinelen gainean daude finkatuta. Zubi-habeak ere badauzka, baina kontragoihabeekiko eta gailurrekiko paraleloan.





Eraikinaren atzealdeko fatxada, perratokiko teilape eta guzti (2004).

Joxin Azkue

## Historia

Iraola baserriaren lehen aipamen dokumentatua XVI. mendearen amaierakoa da (1598). Edonola ere, 1391ean jada jasota zegoen auzotar baten Martin d'Irola izena, Zizurkildarrak Tolosako hiribilduko herritar bihurtzeko aktan parte hartu baitzuen. Beraz, oso litekeena da ordurako eraikia izatea.

1701ean, haren jabe ziren Juan Zabala eta Magdalena Zuaznabarrek maiorazko bat osatzea erabaki zuten, arbasoen oroitzapena ziurtatzeko eta beren ondasunak osorik mantentzeko. Maiorazkora erantsitako ondasunen artean zeuden Adunako Zabala eta Azpikoeta oinetxeak, Alkizako Etxesagasti eta lerrootan aztertutako Iraola. Familiako arazo ekonomiko larrien eraginez, eta beren herentziengatik zerga handia ordaindu behar zutenez (4.500 dukat), ez zuten izan 1721ean maiorazkoa zatitu eta ondasun batzuk saldu beste erremediorik; tartean, Iraola etxaldea. Hala ere, zailtasunak ez ziren guztiz desagertu, eta hurrengo belaunaldiek ere behin baino gehiagotan besterendu behar izan zuten etxea.

Gaur egungo eraikina XIX. mende erditik aurrerako uneren batean egindako berrikuntza baten emaitza da, eta beharbada, badu zerikusirik II. Karlistaldiarekin (1871-1875), inguruko hainbat baserri hondatu baitziren garai hartan. 1897an, eraikinak zati hauek zituen: beheko solairuan, sukalde bat, bi logela eta ukuilua zituena; solairu nagusian, 3 logela eta beste gela batzuk; eta ganbara.

### Baserriaren jabeak:

Idoiaga, Nicolas (1598)
Zabala, Martin (1621)
Zabala, Joanes & Irazu Beldarrain, Catalina (1657)
Zabala, Martin & Egino, Catalina & Arrese, Magdalena (1674)
Zabala, Juan & Inziarte, Maria & Zuaznabar, Magdalena (1683)
Irarreta, Pedro (1721)
Irarreta, Mariano (1755)
Irarreta, Maria Josefa & Irulegi, Domingo (1809 b.l.)
Altamira, Juan Bautista & Bengoetxea, Josefa Antonia (1809)
Fernandez, Fernando (1831)
Irulegi, Maria Josefa & Larreta, Jose Angel (1831)
Larreta, Segunda (1841)
Larreta, Maria Victoria & Zabala, Ladislao (1849)
Zabala, Ursino & Etxaide, Demetria (1895)
Zabala, Ladislao, Isaac Maria, Miguel Maria eta Maria Concepcion (1913)
Zinkunegi, Jose & Iraeta, Maria Martina (1922)
Zinkunegi, Gregorio (1959)
Zinkunegi, Jose Miguel & Arregi, Juana Josefa (1959 b.l.)
Zinkunegi, Jose Francisco & Iraeta, Maria (1959)
Argaia Eizmendi sendia

# 62. Irazuazpikoa

## Etimologia

Batetik *irazu* (iratzea) izena eta *-tza* atzizkia (ugaritasuna) eta bestetik *azpikoa* izenlagunak batzetik sortutako izena, izen bereko beste baserritik bereizteko. Dokumentuetan, izen hauen bidez aipatu izan da baserria: *Yraçu de baxo* (1475), *Yrazu de yuso* (1618), eta 1786an, jada *Irazuazpicoa*.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
ikuspegi zabaleko muino batean.

Koordenatuak:
UTM: X: 574203; Y: 4784363; Z: 187
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 11.6′′; Lat.: 43º 12′ 27.4′′; Alt.: 187





Baserriaren fatxada nagusia (2009).

## Deskribapena

Duela gutxi eraberritu zen baserri hau (1950eko hamarkadan). Oinplano angeluzuzena du, eta harri-horma zurituak, atzealdeko fatxadan izan ezik (harria agerian du fatxada horretan). Jatorrizko harlanduzko eskantzuak zarpiatuaren azpian ezkutatuta daude. Baoek ez dute garrantzi berezirik, eta uniformeki banatuta daude. Etxearen perimetroan zehar, zenbait eranskin gehitu izan zaizkio, abeltzaintzarako, eta nabarmen desitxuratu dute etxe-multzo osoa. Fatxada nagusian (hegoaldekoa) hareharrian landutako armarri bat dago txertatuta, eta hura babesten duen euri-estalkian honako idazkun hau ageri da: *"IHS (Ihesus)/ ANO DE/ 1587 DOMINGO DE/ YRACU"*. Ziur aski, idazkun horrek eraikina eraiki zuen pertsonari egingo dio erreferentzia, edo bestela, eraberritze garrantzitsuren baten ardura izan zuen pertsona bati. Dirudienez, pieza hori aurreko beste eraikuntza batetik hartu zuten.

Eraikinaren barne-egitura erabat eraberrituta dago, eta ez da jatorrizkoaren inolako aztarnarik geratzen.

## Historia

Irazuazpikoa baserria Zizurkilgo 21 oinetxeetako bat da eta, beraz, armarri heraldikoa izateko pribilegioa zuen. Baserriaren lehen aipamen idatzia 1548. urtekoa da; aipamenean dioenez, inguruko saroiak neurtzeko erabiltzen zen burdinazko xafla baserri horretantxe gordetzen zen, une horretan. Bada hori baino lehenagoko dokumentu bat, Ihoan de Yraçu de Baxo izeneko auzotar baten aipamena egiten duena, eta Zizurkildarrak Tolosako hiribilduko herritar bihurtzeko aktan parte hartu zuela dioena (1475). Hortaz, oso litekeena da baserria jada eraikita egotea, orordurako. 1724an, Francisco Beldarrainek maiorazko bat sortzea erabaki zuen, bere ondarea osorik mantenduko zela bermatzeko eta bere familiak prestigio handiagoa izan zezan. Maiorazko hori ondasun hauek osatzen zuten: Irazuazpikoa oinetxeak, Irizibar eta Mendigain oinetxeek eta ganaduarentzako txabolak (geroago Lizardi basetxea izango zena).



Fatxadan txertatutako familia-armarriaren xehetasuna (2009).

Historian zehar izan diren eraikinaren hainbat alokairu-kontratu dauzkagu. 1749ean, maizterrak 58 dukat eta 2 kapoi ordaindu behar zituen urtero eta, horrez gain, karobi bat egin behar zuen, lurra ontzeko. Mende erdi geroago, 1790ean, alokairua 86 dukat eta 2 kapoikoa zen, gutxienez 4 estatu luzeran ubide edo hesi egin behar ziren, bai eta karobi bat ere, lurra ontzeko, eta jabeari 4 gurdikada kare eman behar zitzaizkion, bere lanetan erabil zitzan.

Jatorrizko eraikina aparteko bi etxebizitzatan tokibanatuta ageri da, XVIII. mende amaieraz geroztik. Edonola ere, 1950. urtera arte ez zen banandu behin betiko. Une horretatik aurrera, hainbat lan egin ziren eraikinean, eta goitik behera desitxuratu zen.

## Baserriaren jabeak:

Irazu, Marina & Irizibar, Martin (1553)??
Irazu, Maria Andres & Beldarrain, Francisco (1646)
Beldarrain, Miguel (1670)
Beldarrain, Francisco (1690)
Beldarrain, Juan & Zabala, Magdalena (1735)
Beldarrain, Juan Bautista & Alzate, Maria Antonia (1745)
Beldarrain, Jose Antonio & Etxenagusia, Maria Cruz & Barrena, Ana Maria (1775)
Beldarrain, Jose Domingo & Etxeberria, Josefa Ignacia (1830)
Beldarrain, Jose Ignacio & Irazu, Juana Ignacia (1865)
Beldarrain, Miguel, Juan Jose, Jose Antonio, Francisca Josefa, Justina, Alejo eta Juan Bautista ()
Barriola, Juana (1936 b.l.)
Barriola, Juan Miguel, Pedro, Sabino, Bautista, Eleuteria, Juana eta Nieves (1936)
Ipinza, Pedro & Elola, Ignacia (1945)
Ekialdeko ½
Ipinza, Pedro & Elola, Ignacia (1950)
Ipinza, Santiago & Ugartemendia, Veronica (1959)
Ipinza Ugartemendia sendia
Mendebaldeko ½
Elizegi, Francisca eta Ignacio (1950)
Ugartemendia, Jose Manuel & Tapia, Juliana (1964)
Ugartemendia, Juan & Sarasola, Concepcion (1995)
Ugartemendia, Maria Pilar (2003)

# 63. Irazugoikoa

## Etimologia

Hitz hauez osatua: *irazu* (garoa edo iratzea), *-tza* ugaritasun-atzizkia (ugaritasuna), eta *goikoa* (goialdean dagoena), izen bereko beste baserri batetik bereizteko. Dokumentuetan, honela aipatzen da baserri hori: *Yraçu de suso* (1475), eta, beranduago, *Irazugaraicoa* (1818).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Ikus-eremu zabaleko muino txiki batean.



Koordenatuak:
UTM: X: 574193, Y: 4784476; Z: 192
Geografikoak:
Long.: -2º 5′ 12′′; Lat.: 43º 12′ 31.1′′; Alt.: 192

## Deskribapena

XVI. mendean edo XVII. mendearen lehen erdian eraikitako harrizko baserriaren tipologiari dagokio; gerora, hainbat berriztatze egin zitzaizkion. Oinplano laukizuzeneko eraikina da, bistako paramentuekin; haietan, zenbait egikera mota ikus daitezke, pentsarazten dutenak eraikuntza-fase desberdinetan eginak direla, Mendebaldeko fatxadan, huntzez estalita dagoenean, izan ezik. Jatorrizko eraikinaren hondarrik interesgarrienak Iparraldeko fatxadan daude: sarbide handi bat du, harlanduzko arku zorrotz batez egina. Horrez gain, eraikin osoaren behe-solairuko zati handi batean, harlanduz eginiko hormak dirau oraindik. Ekialdeko fatxadako eskantzu batean dagoen erlaitzak eta bilbaduraren hondarrek pentsarazten dute agian eraikin horrek galeria hegaldunaren antzeko elementu bat izango zuela lehen solairuan.

Geroago (XVIII. mendearen erdialdean?), berriztatze-lan handi bat egin zuten eraikinean, kalitate eskasagoko harri-horma bat eraikita; gainera, baoetan harlanduzko azpadura uniformea jarri zuten, nahiz eta haietako batzuk gerora berriro berriztatu egin ziren. Dirudienez, une horretan sarrera nagusia Hegoaldeko fatxadara aldatu zen, eta hura eraberritu zen gehien. Fatxada horretako estal-



**Baserriaren Hegoaldeko fatxada (2009).**


Jatorrizko eraikinaren sarrerako bao zorrotzaren xehetasuna (Iparraldeko fatxada) (2009).

kipea antzinako hastial irekiaz (egun itsutua) azkendu zen; urkila alderantzikatu bat du, goihabeari eusteko.
Eraikinaren barruko egitura nahiko egoera onean dago, duela gutxiko berriztatzearen ondoren; egikera gehienbat aipatutako bigarren eraikuntza-faseari dagokio. Hainbat pilare ditu, eta besoak, batzuk bikoitzak, habeei eusteko. Piezetako askok enara-buztanaren itxurako mihiztatzeak dituzte (lehen eraikuntza-fasea), baina behar bezala kokatu gabeko piezak dira, aurreko egitura batetik baliatuak. Pilare horiek, behe-solairuan, harrizko poialen gainean bermatuta daude. Zutabe eta frontal batzuetan arrail batzuk ikus daitezke, gaur egun jada ez dauden zurezko oholtzazko itxiturak jartzeko. Estalkipean, zutabeen eta goihabeen zein kontragoihabeen arteko loturak kijera mihiztatzeen bidez eginda daude.

## Historia

Irazugoikoa baserria Zizurkilgo jatorrizko 21 oinetxeetako bat da, eta, beraz, armarria izateko pribilegioa du. Baserri horri buruzko lehen erreferentzia idatzia berankorra da, XVII. mendearen hasierakoa (1618). Aurretiazko dokumentuetan, ordea, jasota dago bizilagun batek, Ihoan de Yraçu de Suso abizena zuenak, Zizurkil eta Tolosa hiribilduaren arteko auzotzeko hitzarmenaren aktan parte hartu zuela (1475); beraz, agian ordurako jada eraikita egongo zen. XVIII. mendearen erdialdera, baserriaren jabeak, Juan Miguel Etxabek, bere jabetzetan (Irazugoikoa eta Zearsoro baserriak eta abere-borda berria) egindako berriztatze-lanak jaso zituen. Haietan guztietan, maiorazkoa ezarri zuen 1755ean, arbasoen oroigarritzat, eta familiak utzitako ondarea zati ez zedin. Edonola ere, hamarkada bat geroago, 1764an, Zearsoro baserria banandu behar izan zuen, eta bere izeba Antonia Etxaberi legez zegokion ondarea utzi, auzi luze baten ostean.


Zizurkilgo Udala
Fatxada nagusia, berriztatzeen aurretik (1973).


Bartolome Auzmendi
Baserriaren ikuspegi (1974)..


Baserriaren Iparraldeko fatxada (2009).

## Baserriaren jabeak:

Etxabe, Juan Perez (1637)
Etxabe, Ignacio (1671)
Etxabe, Francisco & Luzuriaga, Agustina (1696)
Etxabe, Juan & Luzuriaga, Maria (1752 b.l.)
Etxabe, Juan Miguel & Etxenagusia, Maria Ignacia (1752)
Etxabe, Domingo & Belamendia, Ana Josefa (1755)
Etxabe, Jose Antonio & Larrendi, Josefa Antonia (1792)
Etxabe, Jose Ignacio & Igerategi, Maria Josefa (1823)
Etxabe, Jose Bernardo & Galarza, Teresa Antonia (1852)
Etxabe, Juan Bautista (1918)
Urkola, Antonio & Zubeldia, Maria (1948)
Urkola, Jose Nicolas & Jauregi, Jesusa (1961)
Canovas, Luis & Kerejeta, Teresa (1971)
Garmendia, Luis & Urbieta, Manuela (1972)
**Iparraldeko ½**
Garmendia, Inaki (2004)
**Hegoaldeko ½**
Corres, Alberto & Barrero, Francisca (1980)
Artola, Imanol & Negueruela, Manuela (1992)
Soto, Ana


Antzinako zurezko itxiturak habeetan utzitako arrastoak (2009).

## Etimologia

Izendapena ziur asko hitz hauetatik dator: *(h)iri* (leku jendeztatua) eta *arte* (artean); haren esanahia agian "etxe artea" izango zen, herriaren gune nagusian kokatuta baitago.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta dago. Gaur egun, herriko Kultur Etxea dago eraikin horretan.




Koordenatuak:
UTM: X: 575320; Y: 4783539; Z: 114
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 22.6″; Lat.: 43º 12′ 0.3″; Alt.: 114


Joxin Azkue

Baserriaren fatxada nagusia, eraberritzea baino lehen (1987).


Kutxa Fototeka

Baserriaren atzeko fatxada eraberritu baino lehen.

## Deskribapena

Duela gutxi erabat berriztatutako baserria da (1990eko hamarkadan). Eraikin berriak oinplano karratua du, material modernoekin egina da, eta ez du jatorrizko eraikinaren hondarrik gorde; hartan oinarrituta eginiko elementu batzuk baino ez ditu.

Antzinako argazkietan ikus daitekeenez, jatorrizko egiturak oso egikera erregularra eta homogeneoa zuen; fatxada nagusian harlanduzko eskantzuak zituen, bai eta bao nagusien azpaduran ere. Atzeko fatxadak ere oso egikera erregularra zuen; bertan, elementurik bereizgarriena kanporantz irteten ziren harlanduzko harrortzak ziren, haizetik babesteko ezarriak. Gainera, zurezko bilbadura bat zuen, eta haien hormatalen artean zabaltzen ziren baoak.

Eraikinaren barneko egitura ere erabat berriztatuta dago, eta ez du jatorrizko eraikinaren arrastorik.

## Historia

Iriarte baserriari buruzko lehen erreferentzia idatzia gertaera lazgarri batekin lotuta dago: 1689an, su hartu zuen eta suntsituta geratu zen. Gertaera hori, gainera, nahita eraginda gertatu zen, haren jabetza eskuratu nahian gatazka sortu baitzen Miguel Carlos Okendo kapitaina, San Millango markesa eta haren osaba Gabriel San Millan presbiteroaren artean. Dirudienez, etxea presbiteroak eraiki zuen, San Millango maiorazkoaren lur-sail batean, eta horretarako, lehen han zegoen etxe bat bota zuen. Eta ekintza horrek Okendo kapitainaren interesak kaltetzen zituenez, erretzeko agindu zuen. Data hori baino lehenago, Caterina de Yriarte abizena zuen bizilagun baten aipamena dago jasota (1539); beraz, ziur asko une horretan jada eraikita zegoen.

Suntsiketa horren ostean, Okendo kapitainaren oinordekoek berreraikitzeari ekin zioten berehala; 9.200 erreal baino gehiago inbertitu zituzten horretan. Gero, lan horiek jarraipena izan zuten, mende laurden bat geroago Micaela Okendo jabe berriak erabat berritzeari ekin zionean (*"que ha redificado de nuevo" - 1724*); gainera, aipatzen da etxea eskuarki herriko apaizei alokatzen zietela, parrokia-elizatik hurbil zegoelako. Azken eraikin hori da ia gaur egunera arte iraun duena.


GAO. OA 6760

Baserriaren atzeko fatxada, eraberritzea baino lehen (1948)

### Baserriaren jabeak:

Okendo, Miguel Carlos & Etxeberri, Antonia Maria (1689)
Okendo, Micaela & Agirre, Jose (1693)
Agirre, Jose Antonio & Jauregi, Ana & Sarria, Fausta & Altzaga, Maria Ines (1701)
Agirre, Jose Francisco & Porcel, Maria Teresa (1720)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1744)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Salaberria, Maria (1940)
Deriospide, Gaspar & Galarza, Valentina (1947)
Zizurkilgo Udala


Kutxa Fototeka

Herrigunearen airetiko ikuspegia, Iriarte baserria erdian dagoela, berriztatu baino lehen (1980).



GAO. JDT. 383-3

Zizurkilerako sarbide-errepide berriaren trazaduraren planoa, Iriarte Txiki baserria botatzea aurreikusten zuena (1921).

# 65. Irizibar

## Etimologia

Hitz hauez osatua: *irazu* (garoa edo iratzea) eta *ibi/ibar* (pasabidea, harana). Dokumentuetan gehien agertzen den izendapena gaur egungo formari dagokiona da, baina badira beste aldaera batzuk ere, hala nola *Iraçibar* (1391), *Ysibar* (1860) eta *Yribar* (1862).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Zaldu errekaren ondoko ordeka zabal batean dago, eta Asteasu udalerriarekin egiten du muga.



Koordenatuak:
UTM: X: 574036; Y: 4783765; Z: 112
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 19.4″, Lat.: 43º 12′ 8.1″; Alt.: 112


Bartolome Auzmendi
Baserriaren fatxada nagusia (1974).

## Deskribapena

XVI. mendean edo XVII. mendearen lehen erdian eraikitako harrizko baserriaren tipologiari dagokion baserri gotiko-errenazentista da. Geroago, eraberritze garrantzitsua egin zitzaion (XVIII. mendearen amaieran). Gaur egun, abeltzaintzarako soilik erabiltzen da. Oinplano laukizuzeneko eraikina da, kareztatutako harri-hormak ditu, bai eta harlanduzko lanak ere, eskantzuetan eta jatorrizko baoen azpaduran. Gainerako baoek ez dute garrantzirik, eta oso modu erregularrean antolatuta daude. Ekialdeko fatxadan, mandioko atea zabaltzen da mendi-hegalerantz, eta hormigoizko zubi bat du sartzeko.
Baserriaren inguruan oin berriko zenbait eraikin egin dira, bai etxebizitza-erabilerarako, bai abereentzako ukuiluak jartzeko.
Eraikinaren barneko egitura erabat berriztatu zen behe-solairuan, duela hogeita hamar bat urte, eta zutabe guztiak kendu ziren, bat izan ezik. Estalkipean, jatorrizko egitura hobeto kontserbatu da: zenbait pilare ditu, kontragoihabeen pisuari eusten diotenak. Pilare horiek besoak dituzte ahokatuta; batzuk kurbatuak dira, eta jatorrizko eraikinekoak diren enara-buztanaren itxurako mihiztatzeak dituzte. Horrez gain, erdian teilatu-gailurrak ikus daitezke; zutabeei lotuta daude, txabeta-mihiztatzeen bidez, zurezko pasaziriekin. Pilareetako batean, bestalde, elementu geometrikoz osatutako trazadura apaingarriak ikus daitezke, bat datozenak denboran jatorrizko eraikinaren egikerarekin.


Joxin Azkue
Baserriaren atzeko fatxada (2005).

## Historia

Irizibar baserriaren lehen aipamena XVI. mendearen erdialdekoa da (1553). Nolanahi ere, mende batzuk lehenago jada jaso zen Sancho Martinez de Iraçibar abizena zuen bizilagun baten berri; hain zuzen, Zizurkil eta Tolosa hiribilduaren arteko auzotzeko hitzarmenaren aktan parte hartu zuen (1391); beraz, ziur asko une hartan jada eraikita egongo zen.
1724an, Francisco Beldarrainek maiorazko bat sortzea adostu zuen, bere ondareak oso-osorik iraungo zuela bermatzeko eta bere familiaren prestigioa areagotzeko. Maiorazko hori eraikin hauek osatzen zuten: Irazuazpikoa oinetxea, Irizibar eta Mendigain, eta abere-borda bat (geroago, Lizardi baserria).
Baserria aspaldi jarri zuten alokairuan jabeek, errendimendua areagotzeko asmoz. 1696an jada, Juan Martinez Alzatek 30 dukat eta 2 kapoi ordaintzen zuen alokairua. Mende bat geroago, 1790ean, urtero 69 dukat eta 2 kapoi ordaintzeko betebeharra zuen maizterrak, eta gainera, karobi bat egin behar zuen, bai eta12 gurdikada kare utzi eta 16 gurdikada harri ekarri ere, etxean lanak egiteko.


Joxin Azkue
Eraikinaren fatxada nagusia, mendi-hegaletik behera ikusita (2005)



Pilareek osatutako egitura, alboetako besoekin, estalkiaren egiturari eusten diotela. (2008).



Eraikinera sartzeko baoa, harlanduzko azpadurarekin (2008)



Estalkipeko piezetan egindako elementu apaingarriak (2008).



**Baserriaren kokapen orokorra, inguruan eraikin berriak dituela (2008).**

## Baserriaren jabeak:

Irizibar, Martin & Irazu, Marina (1553)
Irazu, Maria Andres & Beldarrain, Francisco (1646)
Beldarrain, Miguel (1670)
Beldarrain, Francisco (1690)
Beldarrain, Juan & Zabala, Magdalena (1737)
Beldarrain, Juan Bautista & Alzate, Maria Antonia (1745)
Beldarrain, Jose Antonio & Etxenagusia, Maria Cruz & Barrena, Ana Maria (1775)
Beldarrain, Jose Domingo & Etxeberria, Josefa Ignacia (1830)
Gorostidi, Jose Antonio & Beldarrain, Ana Joaquina (1862)
Gorostidi, Victoriano & Usandizaga, Gregoria (1895)
Gorostidi, Dominica Josefa eta Domingo (1902)
Ugartemendia, Juan Blas & Iztueta, Maria (1946)
Ugartemendia, Pedro Maria & Beldarrain, Josefina
Ugartemendia Beldarrain sendia

# 66. Iruña

## Etimologia

Izenak *huri/iri* erroarekin du lotura. Urteen joanean zenbait modutan aipatzen da baserriaren izena dokumentuetan: *Irunu* (1391); *Yruyne* (1545) edo *Yruñe* (1598).

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago.
Arangaitz baserritik eta hilerrira doan bidetik hurbil dagoen zelaigune batean.



Koordenatuak:
UTM: X: 575667; Y: 4783225; Z: 135
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 73″, Lat.: 43º 11′ 50″; Alt.: 135



Baserriaren fatxada nagusia (2009)

## Historia

Iruña baserriari buruzko lehen aipamen idatzia XVI. mendearen amaierakoa da (1598). Dena dela, dokumentu horretan Ihoan Sanchez d'Irunu abizena zuen herritar bat ere aipatzen da, Zizurkil Tolosa hiribilduarekin auzotzeko hitzarmenean parte hartu zuela esaten da (1391), eta, hortaz, seguruenik garai hartan eraikita zegoen.

Jatorrizko eraikin horren ezaugarriei buruzko daturik ez dugu. Badirudi eraikin hura XVII. mendearen erdialdean (1659) berritu zutela, nahiz eta ez jakin zenbateraino berritu zen.

Beste baserri asko bezala, Iruña baserria ere alokatu egiten zuten jabeek. 1775. urtean, Sebastian Lasa maizterrak urteko errentaren truke 60 dukat eta 2 dukat ordaindu behar zien, eta, horrez gain, lurzorua ontzeko karobi bat egiteko betebeharra zuen.

## Deskribapena

Duela ez asko erabat berritutako baserria (1940-1950 hamarkadan). Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, material modernoekin egina dago eta aurreko eraikinaren arrasto bakar bat ere ez du. Barruko egitura ere erabat berrituta dago.

Iparraldera ematen duen fatxadaren ondoan, eranskin bat du eta prentsa mekanikoko dolarearen azpila dago bertan.

## Baserriaren jabeak:

Olaza, Martin (1598 b.l.)
Olaza, Maria & Zarauz, Joanes eta Landare, Maria Miguel (1598 b.l.)
Luzuriaga, Pedro (1598)
Mendigarai Iruñe, Mateo & Agirre, Maria (1659)
Mendigarai Iruñe, Gabriel & Beldarrain, Magdalena (1696)
Mutio, Manuela & Etxenagusia, Ignacio (1733)
Etxenagusia, Maria Josefa & Iguaran, Andres (1760)
Iguaran, Miguel Juan Cruz & Rekondo, Maria Concepcion (1791)
Iguaran, Juan Jose & Olaziregi, Ana Joaquina (1819)
Iguaran, Miguel Juan Cruz (1843)
Iguaran, Miguel Jose & Amilibia, Micaela Josefa (1866 b.l.)
Iguaran, Josefa Catalina, Jose Agustin, Josefa Ignacia eta Miguel Joaquin (1866)
Iguaran, Josefa Catalina & Geresta, Juan Bautista (1866)
Geresta, Nazario & Maiz, Maria (1912)
Geresta, Miguel Jose & Mujika, Lesmes (1967)
Geresta, Cruz Maria eta Felix (1995)
Geresta Mujika sendia



Joxin Azkue

Egungo baoen egituraren xehetasunak (2004).

## Etimologia

Izena *iturri* eta *alde* hitzek osatzen dute.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Ihartzaren eremuan. Zabalgune handi batean, ikuspen-eremu handia duen maldaren erdialdean.




Koordenatuak:
UTM: X: 576351, Y: 4783016; Z: 86
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 37.1″; Lat.: 43º 11′ 43″, Alt.: 86


Joxin Azkue

**Baserriaren alboko fatxada, jatorrizko eraikinaren eskantzuen arrastoak agerian dituela, berritu ondoren (2005).**

## Deskribapena

Duela gutxi berritutako baserria da. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eta hormek agerian uzten dute zenbait aldiz eraikia izan dela, eta, halaber, beste adierazle bat bada: baserria bi etxebizitzak osatzen dute. Hori guztia dela eta, ez dio jatorrizko irudiari eutsi.

Hegoaldera ematen duen baserriaren erdia material modernoekin egindako horma bat da, jatorrizko eraikina erabat aldatu ondoren. Ez du jatorrizko elementu bakar bat ere gorde; esate baterako, beheko solairuak zituen harlanduz inguratutako baoak ez daude.

Iparraldera ematen duen baserriaren erdia kareztatutako harrihormaz egina dago, eta ertzetan harlandua du. Nabarmentzeko modukoa da eskantzua, mendebaldera ematen duen beste erdialdearen fatxadaren mugan.

Bi erdi horien barruko egiturari dagokionez, erabat berrituta dago eta material modernoek ordeztu dituzte jatorrizkoak. Izan ere, bi horietako bakoitzean egindako berritze-lanen ondorioz, aurreko eraikuntzaren arrastorik ez da geratu.

## Historia

Iturralde baserriari buruzko lehendabiziko datuak XVI. mendearen amaierakoak dira (1596). Dena dela, dokumentu horretan Chartico de Iturralde abizena zuen herritar bat ere aipatzen da, Zizurkil Tolosa hiribilduarekin auzotzeko hitzarmenean parte hartu zuela esaten da (1475), eta, hortaz, seguruenik garai hartan eraikita zegoen. Zizurkilen 21 jatorrizko oinetxe daude, eta, baserria, horietako bat da. Beraz, armarria izateko ohorea du.

Eraikina aspaldi samarretik dago bi etxebizitzatan banatuta, nork bere jabea duen (XVII. mendearen erdialdea). Hori hala izateak ondorio nabarmenak eragin dizkio eraikinaren eboluzioari berari, egungo eraikuntzan ikus daitekeenez.

Iparraldera ematen duen baserriaren erdia Irazugoikoa oinetxearen maiorazkoari dagokio XVIII. mendearen amaieraz geroztik, Domingo Etxabek egindako testamentu baten bidez. Familia horrek aurreko mendetik zuen baserria jabetzan, eta familia horrek berak jarraitu zuen jabetzan izaten hurrengo hamarkadetan. Beste erdiari dagokionez, hegoaldera ematen duenari, apenas dago eboluzioari buruzko datu esanguratsurik. Nabarmentzeko moduko alderdi bakarra arotzeriako lana da. Pedro Aldakok etxea erosi zuen 1736-1738 urteen inguruan, eta, geroztik egin ziren lan horiek eraikinean; esate baterako, urte horietan beste aterpe bat egin zela aipatzen da.

## Baserriaren jabeak:

Iturralde, Joanes (1596)

**Iparraldeko ½**

Etxabe, Polonia & Munita, Joanes (1677)
Etxabe, Ignacio (1701)
Etxabe, Juan Miguel & Etxenagusia, Maria Ignacia (1752)
Etxabe, Domingo & Belamendia, Ana Josefa (1755)
Etxabe, Jose Antonio & Larrendi, Josefa Antonia (1812)
Etxabe, Jose Ignacio & Igerategi, Maria Josefa (1823)
Etxabe, Miguel Jose (1852)
Etxabe, Francisco & Urruzola, Maria Josefa (1901)
Etxabe, Jose Francisco & Etxabe, Maria Josefa (1911)
Martínez, Alfonso & Zubizarreta, Maria Dolores
Martínez Zubizarreta sendia

**Hegoaldeko ½**

Juansoro, Francisco Lucas (1700)
Aldako, Pedro & Etxabe, Maria Bautista (1728)
Aldako, Andres Antonio & Agirre, Maria Rita (1765)
Aldako, Ana Joaquina & Elizondo, Juan Bautista (1770)
Aldako, Maria Magdalena & Rekondo, Simon Ignacio (1774)
Aldako, Martin & Irigoien, Magdalena (1782)
Goikoetxea, Jose Joaquin & Etxabeguren, Maria Concepcion (1812)
Goikoetxea, Sebastian & Arreseigor, Josefa Antonia (1834)
Goikoetxea, Maria Joaquina & Galarza, Jose Ignacio (1907 b.l.)
Galarza, Jose Bernardo & Goikoetxea, Valentina (1907)
Galarza, Pedro Antonio & Aiastui, Maria Ascensión (1932)
Galarza, Jose Bernardo
Galarza Aiastui sendia

## Etimologia

Ez dakigu zein den izenaren etimologia. Dokumentuetan zenbait modutan aipatzen da baserria, eta izena aldatuz joan da denboraren joanean, gaur egun ezagutzen dugun izena arte: *Eçumiça* (1543); *Ezumiz* (1618) edo *Yzumiz* (1733).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Zabalgune handi batean, Atxulondoko burdinolara doan herribide zaharraren maldaren erdialdean. Andoain eta Aduna udalerrietako mugetatik ez oso urruti.



Koordenatuak:
UTM: X: 576352; Y: 4787181; Z: 300
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 35′′; Lat.: 43º 13′ 58′′; Alt.: 300

## Deskribapena

Baserria gaur egun eroria dago. Oinplano angeluzuzeneko eraikina zen, kareztatutako harri-hormaz egina zegoen, eta ertzetan harlandua zuen. Baoen ateburu monolitikoen lana zabar samarra zen.
Baserritik metro gutxira Itzumitz Berri baserria dago. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, kareztatutako harri-hormaz egina. Baoek ez dute aparteko berezitasunik eta homogeneo samar banatuta daude. Estaldura duela gutxi berritu dute.


Patxi Otegi

**Itzumitz baserria eta Itzumitz Berri, lehendabizikoa erori aurretik (1987).**

## Historia

Dirudienez, Itzumitz baserria XVI. mendearen lehen erdialdean eraiki zen, udalaren jabetzako partzela batean. Baserriari buruzko lehendabiziko aipamena 1539. urtekoa da. Baserria eraikitzeak Donemiliagako jauna haserretzea eragin zuen. Izan ere, hark zenbait baserri eraiki zituen (Pagamendi, Arizkurutzeta, Ezkeltzu…) eremu berean, eta herri-larreak erabiltzeko oztopo izan zen.
Baserria udalak berak eraiki zuen, eta zenbait mendetan, aldian-aldian, alokatu egiten zuen. Hasiera batean, hurbil dagoen Atxulondoko burdinola eta errotarekin batera alokatzen zuen, baina XVIII. mendearen amaieraz geroztik bereizita alokatzen hasi zen (Atxulondon produkzio-jarduera bertan behera geratu zen garaian). Horrenbestez, dokumentuen arabera, 1790. urtean Miguel Antonio Oianarte izan zen maizterra eta 75 dukat ordaindu zituen urteko alokairuaren truke.


**Baserria eroria (2009).**

Gerra napoleonikoek zor asko eragin zituen, eta, horren ondorioz, Kontzejuak zenbait jabetza besterendu egin behar izan zituen halabeharrez, eta horietako jabetzatako bat Itzumitz baserria izan zen. Bi zatitan saldu zen 1811. urtean; ekialdekoa Miguel Ignacio Artolak erosi zuen eta, mendebaldekoa, berriz, Juan Francisco Mutiok eta Fernando Zabalak. Azken hori, halaber, beste bi zatitan banatu zen 1855. urtean; Fernandoren seme Jose Ramon Zabala eraikinaren gorputzaren eta etxearen inguruko erdiaren jabe egin zen, eta Juan Franciscoren seme Juan Ascensio Mutio, berriz, ondoko teilapearen eta mehenilaren erdiaren jabe, beste eraikin bat egiteko asmoa baitzuen bere jabetzako lurzoruetan, dokumentuetan jasotakoaren arabera: *“nuebo edificio que proyecta construir”*.
Garai hartan, XIX. mendearen erdialdean, Miguel Antonio Azkuek eta Maria Antonia Artolak (Miguel Ignacioren alaba) beste baserri bat eraiki zuten aurrekoaren inguruan, eta Itzumitz Berria izena jarri zioten, gaur egun irauten duena.


**Baserria eroria (2009).**


**Itzumitz Berri baserriaren fatxada nagusia (2009).**

Zizurkilgo Udala



**Juan Antonio Amunarriz eta Maria Artola (1950).**

Zizurkilgo Udala



**Juan Antonio Amunarriz eta Maria Artola, ezkontzaren egunean (1920).**




Baserriaren alboko fatxada (2004).

## Baserriaren jabeak:

Udala

Ekialdeko ½

Artola, Miguel Ignacio & Karrera, Maria Magdalena (1811)

Artola, Maria Antonia & Azkue, Miguel Antonio (1815)

IparMendebaldeko ¼

Mutio, Juan Francisco & Zabala, Josefa Ignacia (1811)

Mutio, Juan Asencio & Sarobe, Francisca Javiera (1842)

Mutio, Maria Martina, Josefa Ignacia, Manuela Josefa eta Juan Bautista (1887)

HegoMendebaldeko ¼

Zabala, Fernando & Iurramendi, Micaela (1811)

Zabala, Luis Antonio & Itxaso, Nicolasa (1830)

Zabala, Jose Ramon & Artola, Josefa Ignacia (1840)

Zabala, Jose Antonio & Uranga, Bibiana Toribia (1865)

Zubeldia, Jose Francisco (1894)

Amunarriz, Juan Antonio & Artola, Maria

Amunarriz, Andres & Dorronsoro, Maria (1939 b.l.)

Garmendia, Jose Martin (1939)

Urkola, Juan (1946)

Murua, Jose Maria

# 69. Kamioaundi

## Etimologia

Dirudienez, *kamino* izena eta *aundi* adjektiboa batzetik sortu zen izena, haren homonimotik bereizteko; izan ere, homonimo horren bidez, errege-bide zaharraren ondoan zegoela adierazten da. Dokumentazioan *Camio* izena edo, bestela, *Camio mayor* (1825) aipatzen da.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Villabonara doan egungo errepidearen zabalgune batean, Kamiotxiki baserritik hurbil.



Koordenatuak:
UTM: X: 575588; Y: 4783606; Z: 112
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 10.6″, Lat.: 43º 12′ 2.4″, Alt.: 112

## Deskribapena

Egurrezko egitura eta harri-hormaz egindako baserri-tipologiakoa da Kamioaundi baserria, XVIII. mendean eraikia. Oinplano angeluzuzeneko eraikina, kareztatutako harri-hormaz egina eta eskantzuetan harlandua duena. Jatorrizko baoek ere harlandua dute inguruan, ekialdera ematen duen fatxadakoek izan ezik, sinpleagoak baitira. Guztiak modu erregularrean, homogeneo kokatuta daude, ondo antolatuta.

Eraikina bi etxebizitzatan banatuta dago, eta hala banatu zenetik erantsi dizkiote baserriari zenbait eraikuntza (eskailerak bigarren solairura igotzeko, garajeak); ondorioz, neurri batean, jatorrizko kutsua galdu eta jatorrizko fatxadak ezkutuan geratu dira.

Eraikinaren barrualdeko egitura erabat berrituta dago, eta ez du antzinakoaren arrastorik ere.



Joxin Azkue

**Eraikinaren atzealdeko fatxada (2004).**



**Fatxada nagusia (2009).**



Zizurkilgo Udala

**Maria Jesus Arrutiren ezkondu aurreko agur-afaria; mahaiburuan ageri da bera (1957).**



Bartolome Auzmendi

**Kamioaundi eta Kamiotxiki baserrien kokapena (1974).**

## Historia

Kamioaundi baserria XVIII. mendearen lehen erdian eraiki zen, nahiz eta noiz ez dakigun; lehendabiziko aipamena 1743. urtekoa da.

Eraikina, 1887. urtean, honela osatuta zegoen: beheko solairuan, ukuilua; solairu nagusian, egongela 1, 2 ganbara itsu, logela 1 eta sukaldea; bigarren pisuan, 3 gelako egongela 1, 3 logela eta sukaldea eta ganbara. Kanpoko aldeari dagokionez, alboetan teilatupe bana: bata, sutegirako, eta, bestea, ogi-laberako. 1950. urtean banatu zen bitan, egungo egiturari dagokiona. Hau da, beheko solairua eta teilatupe bat dagokio zati horietako bati, eta finkaren gainerako zatia besteari.

Jabeek, aldian-aldian, eraikina alokatu egiten zuten. Dokumentuen arabera, 1776. urtean errenta 16 dukatekoa zen (proportzioa bera zuen 1835. urtean).

Zizurkilgo Udala



Ascensio Arruti eta Juli Balda, Zelatunen izaten zen erromerian (1956).

Zizurkilgo Udala



Ezkerraldean, Maria Pilar Arruti, eta, eskuinaldean, Arandabarroko Miren Artola; Ernio mendiko gurutzean (1957).

Zizurkilgo Udala



Ascensio Arruti eta Juli Balda ezkondu zireneko argazkia (1935)



Joxin Azkue

**Kamioaundi eta Kamiotxiki baserriak, elur-ekaitzak estalita (2005).**

## Baserriaren jabeak:

Garagarza, Joaquin & Ozin, Maria Bautista (1743 b.l.)
Garagarza, Maria Joaquina (1743)
Ameztoi, Gabriel & Zaldua, Maria Ignacia (1746)
Ameztoi, Martin Jose & Laskibar, Maria Micaela (1776)
Ameztoi, Manuel Fermin & Ihartza, Atanasia (1822)
Ameztoi, Jose Benito (1862)
Ameztoi, Antonino (1905)
Ameztoi, Vicente & Terrados, Blanca (1942)
Mendebaldeko ½
Urdanpilleta, Modesta & Zurutuza, Jose (1950)
Zurutuza, Miguel
Zurutuza Urdanpilleta sendia
Ekialdeko ½
Arruti, Ascensio & Balda Julia Josefa (1950)
Arruti, Ramona (1983)
Sarasua Arruti sendia

# 70. Kamiotxiki

## Etimologia

Kamiotxiki izen hau *kamino* errotik dator ziurrenik. *Txiki* adjektiboa darama, izenkide den beste batekin ez nahasteko. Izenak errege-bide zaharraren parean hartzen zuen kokagunea zehazten du. Agirietan *Camio menor* (1825) edo *Camio chiquia* (1776) gisa azaltzen da.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Billabonarako egungo errepidearen inguruan, Kamioaundi baserritik gertu.




Koordenatuak:
UTM: X: 575565; Y: 4783609; Z: 112
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 11.7″, Lat.: 43º 12′ 2.5″, Alt.: 112

## Deskribapena

Zeharo eraberrituta dago (1990eko hamarkada), baina orain gutxi ere berritu egin dute. Oinplano angeluzuzeneko etxea da. Harrilanezko horma karez zurituak ditu, eta harlanduzko eskantzuak. Baoak arruntak dira eta modu erregularrean antolatuta daude. Hegoaldeko fatxadan zegoen sarrera nagusia 2004an itxi eta Ekialdeko fatxadara aldatu zuten, bertan arkupe txiki bat eginez. Barrualdetik ere berrituta dago guztiz.

## Historia

Kamiotxiki baserriaren jatorria estu lotuta dago bizilagun duen Kamioaundi baserriari. Iritzi guztien arabera, Kamioaundi baserriko jabeek (Gabriel Ameztoi?) baserri berri bat eraikitzea erabaki zuten XVIII. mendearen erdialdean. Lehenengoarengandik oso gertu eraiki eta izen berbera jarri zioten, beren lur-sailei etekin handiagoa ateratzeko.
1887an, etxeak 2 ukuilu zituen beheko solairuan, 6 gela solairu nagusian, sukaldea eta ganbara.


Zizurkilgo Udala
Baserria, azken eraldatzea baino lehen (2000).


Baserriaren alboko fatxada (2009).


Zizurkilgo Udala
Tapia anaia-arrebak, baserriaren inguruan: Koldo, Joxe Mari, Bittori, Juana Mari, Izaskun, Eugeni eta Karmen (1956).


Zizurkilgo Udala
Angel Mari Tapia, ezkerraldean, aterki zuria eskuan, lagun talde batekin (1926).

### Baserriaren jabeak:

Ameztoi, Gabriel & Zaldu, Maria Ignacia (1776 b.l.)
Ameztoi, Martin Jose & Laskibar, Maria Micaela (1776)
Ameztoi, Manuel Fermin & Ihartza, Atanasia (1825)
Ameztoi, Ignacia Josefa (1662)
Ameztoi, Jose Benito (1905 b.l.)
Ameztoi, Antonino (1905)
Ameztoi, Vicente & Terrados, Blanca (1942)
Tapia, Angel Maria & Garmendia, Guadalupe (1950)
Tapia, Juana Maria & Garmendia, Jose Julian
Tapia Garmendia sendia

## Etimologia

Izena *Landa* errotik dator.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Zearsoroko txara muinoaren magalean, mendi-mazelaren erdian.




Koordenatuak:
UTM: X: 574205, Y: 4784079; Z: 181
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 11.7″; Lat.: 43º 12′ 18.2″; Alt.: 181


Patxi Otegi

Fatxada nagusia (1987).

## Deskribapena

XVIII. mendean eraikitako baserria, harri-hormak ditu eta egurrezko egitura. Bertan behera utzia eta hondamen bidean dago. Eraikinak harri-hormaz egindako oinplano angeluzuzena du. Hormetako kare zuria hondatuta dago, eta eskantzuak harlanduzkoak ditu. Baoek harlanduzko azpadurak dituzte fatxada nagusiaren (Ekialdea) beheko solairuan, eta azpimarratzekoa da sarrera nagusian duen dobela luzeko erdi-puntuko arku beheratua. Eraikinak dituen gainerako baoek egurrezko azpadurak dituzte. Etxearen antolaketa nahiko homogeneoa da. Baserri barruko egitura zeharo hondatuta dago. Beheko solairuan, sarbide duen txoko bakarrean, nabarmena da zutikoak hartzen dituzten harrizko pilare-harrien bolumena.



Albo bateko fatxada (2009)

## Historia

XVII. mendeko (1618) agiriek Zizurkilgo Udala hiribildu izendatzeko kostua ordaintzen lagundu zuten etxeen artean aipatzen dute: *"la casa de Landare"*.

Hala ere, baserriari lotutako datuak eskasak dira. Baina bereziki azpimarragarri da Juan Zarauz (edo Zarauzena) bertako jabeak 1704an egin zuen testamentua. Horren bitartez oinordekotza sortzeko agindua ematen zuen, etxalde guztiak bere oinordekoen esku geldituko zirela ziurtatzeko. Eraikina oso-osorik itxuraz aldatu eta gure egunetaraino heldu zaigun irudia garai hartakoa da, askoz gerokoagoa ez behintzat.


Joxin Azkue

Baserriaren alboko fatxada (2005).

## Baserriaren jabeak:

Zarautz, Juan (1704 b.l.)
Zarautz, Martin & Zabala, Maria Josefa (1704)
Zarautz, Mateo & Zaldua Arritxipi, María Josefa (1752)
Zarautz, Ignacio & Etxabe, Catalina Antonia (1791)
Zarautz, Jose Francisco & Lejaristi, Maria Concepcion (1840 b.l.)
Etxeberria, Sebastian & Zabala, Ana Josefa (1840)
Etxeberria, Manuela Antonia, Josefa Joaquina, Josefa Ignacia eta Maria Francisca (1862)
Etxeberria, Jose Domingo & Irarreta, Maria Pilar (1880)
Etxeberria, Silveria Pia & Otaño, Jose Ignacio (1919)
Otaño, Jose Domingo & Ugartemendia, Maria Carmen (1942)
Otaño, Antonio eta Eva
Otaño Ugartemendia sendia

## Etimologia

Ez dago oso garbi izenaren jatorria zein den, agian erroa *larre* (zelai, belardi) izan daiteke. Hainbat modutara agertzen da aipatuta: *Larritayn* (1475); *Larriten* (1618); *Larritin* (1877). Herrian ezaguna da Lartin izenaz ere.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Mendixka txiki baten gaine-an.Herrigunearen goialdean.



Koordenatuak:
UTM: X: 575.269 Y: 4783463 Z: 121
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 24.8″; Lat.: 43º 11′ 55.6″; Alt. 121



Atzealdeko fatxada (2009).

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserri handia da, harri-hormaz eta zurezko egituraz eraiki ohi ziren baserrien modukoa. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eta bi isurkiko estalkia du. Beheko solairua, solairu nagusia eta ganbara ditu. Kanpoko hormak bistako manposteriaz eginak daude, eta eskantzuak harlanduz kateatuak. Bao guztiek goiko partean adreiluzko arku beheratuak dituzte apaingarri gisa, bi izan ezik, harlanduzkoak direnak, beharbada aurretik egindako eraikuntzarenak.

Barrualdean jatorrizko egitura mantentzen du, zaharberrituta dago eta oso egoera onean. Solairu bakoitza sekzio handiko zutikoez osatuta dago, begizta mihiztaduren eta zapaten bidezko habe frontalei lotuta. Beheko solairukoek harrizko poialak dituzte. Ganbaran, berriz, zutikoak zurezko pasaziridun txabeten bitartez lotuta daude estalkiko egiturari.



Zizurkil ikuspegi orokorra XX. mendearen hasieran (1915).

GFA. GAO-AGG. OA 6759

## Historia

XV. mendearen bukaeran (1475) Pedro de Larritayni buruzko aipamena egiten da, Zizurkilgo herria Tolosan auzoko egiteko prozesuaren haritik. Hala ere, baserriari buruzko lehenbiziko aipamen zehatza 1602. urtea baino lehenagokoa da.

XIX. mendearen bukaeran eraikuntza horrela zegoen: *"amenazando ruina"*. Litekeena da berria eraikia egon eta aurrekoaren aztarna guztiak garai hartan ezabatu izana (harlanduzko baoak?). 1990eko hamarkadan fatxada guztiak berriztatu egin zituzten entokadura eta kanpoko pintura kenduz eta harri-hormak bistan utziz.

XIX. mendearen hasieran bi zati berdinetan alokatzen zen. Jose Joaquin Illarramendi zen maizterretako bat, eta 42 dukat, 4 anega gari eta 6 anega arto ordaindu behar zituen 9 urteetako urte bakoitzeko (1807). Mende horren bukaeran (1881), eraikina honela osatuta zegoen: beheko solairua ukuiluarekin, sukaldea eta gelak, solairu nagusia logelekin, eta ganbara. Une horretan baserriak eta bere jabetzak esparru biribil bat osatzen zutela aipatzen da; beraz, litekeena da Zizurkilgo artzain saroietako bat izatea jatorrian eta geroago baserri bilakatzea. Beheko solairuan orain dela gutxi arte denda eta jatetxea egokituta izan zituen.

### Baserriaren jabeak:

Larritain, Joanes (1602)
Beldarrain, Miguel & Zaldua, Maria Miguela (1722)
Beldarrain, Magdalena & Atxaga, Ignacio (1732)
Atxaga, Miguel Antonio & Larrondobuno, Maria Josefa (1774)
Atxaga, Jose Eusebio & Elusa, Teresa Antonia (1790)
Atxaga, Jose Ignacio (1807)???
Atxaga, Domingo Ignacio (1816)
Atxaga, Jose Manuel & Intxaurrondo, Maria Bautista (1836)
Atxaga, Jose Jacinto & Albisu, Maria Luisa (1869)
Atxaga, Juan Pedro & Makuso, Severina (1916)
Atxaga, Jacinto & Tapia, Maria Asuncion (1932)
Atxaga, Jose Ignacio, Francisco Maria, Manuel eta Maria Jesus (1966)
Atxaga Tapia sendia



Bartolome Auzmendi

**Baserriaren fatxada nagusia (1974).**



Patxi Otegi

**Baserriaren fatxada nagusia (1987).**

**Barruko egituraren xehetasuna non zutikoa eta alboko tirantearen harteko lotura agertzen den (2009).**

# 73. Larrondobuno

## Etimologia

Izena *larre*, *ondo* (ondoan) eta *buno/muño* (muino) erroak osatzen dute.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Inguruetako bista zabala duen muino baten gainean.




Koordenatuak:
UTM: X: 574845; Y: 4783528; Z: 111
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 43.6″; Lat.: 43º 12′ 0.1″; Alt.: 111



**Baserriaren atzealdeko fatxada (2008).**

## Deskribapena

Baserri barrokoa da, XVII. mendearen bukaeran harri-hormaz eta zurezko egituraz eraiki ohi ziren baserrien modukoa. Baserri oso handia da, eta oso modu homogeneo eta erregularrean antolatuta dago. Oinplano angeluzuzeneko etxea da. Harri-horma karez zurituak ditu, mendebaldeko fatxadakoak izan ezik, agerian bait daude. Fatxada nagusian (Ekialdea) bao guztiek harlanduzko azpadurak dituzte, baina garrantzi gutxikoak dira gainerako guztien osagaiak. Fatxada horretan nabarmena da arkupeak hartzen duen lekua: dobela luzeko erdi-puntuko hiru arku ditu harlanduzko zutabeen gainean, eta gaur egungo etxebizitzarako sarbide da. Atzealdeko fatxadari itxura arrunteko egitura bat erantsi zaio.

Baserria guztiz berrituta dago barrutik, eta estalkia ere orain dela gutxi (2005) berritu dute.

## Historia

XVI. mendeko (1553) agiriek Larrondobuno baserria aipatzen dute. Dena den, lehenago ere aipatzen da Johan Perez de Larraondobuno izeneko bizilagun bat, Andatza (1389) mendien jabetzari buruzko auzi batean nahastuta zegoela berri emanez, beraz, litekeena da garai horretan baserria eraikia egotea.

Larrondobuno baserria Zizurkilen dauden 21 oinetxeetako bat da, beraz, armarria izateko eskubidea du. Gehiegizkoa badirudi ere, aipagarri da XVIII. mendearen hasieran hari buruz esaten dena: *"ha sido y és solar antiquisimo noble y de notorios hijosdalgos de los primeros pobladores de esta dicha Provincia"*.

1711n, bere jabeek, Juan Larrondobunok eta Catalina Ihartzak, maiorazko sortzea adostu zuten, haien oroitzapena luzaroan iraun zezan eta utzitako ondarea oinordekoen artean eman zitezkeen banaketetatik babesteko. Maiorazko hori Larrondobunoko, Altziturriko eta Odolkierragako oinetxeek osatu zuten. "Blindaje" hori egin bazuten ere, familiak arazo ekonomiko asko izan zituen, eta XIX. mendearen erdialdera, maiorazkoek zati handi bat saldu behar izan zuten utzi zitzaien ondare hartatik (Egieta, Olatza, Arrieta, Altziturri eta Odolkierraga etxeak), Larrondobuno baserria zentsu-kargetatik libre eusteko asmoz (1847).



Bartolome Auzmendi

**Larrondobuno baserriaren inguruko belardiak (1974).**

Kutxa Fototeka

**Baserriaren fatxada nagusia (1980ko hamarkada)**



Baserriaren fatxada nagusia (2008).



Joxin Azkue

Arkupeen xehetasuna (2004).



Julian Arrastoa

Baserria, haranaren sakonetik ikusita (1995).

## Baserriaren jabeak:

Larrondobuno, Magdalena & Legarralde, Joanes (1553 b.l.)
Larrondobuno, Maria Juanez & Etxeberria, Pedro (1553)
Larrondobuno, Diego & Larrondobuno, Maria Perez (1590)
Larrondobuno, Ignacio & Zatarain, Maria (1645)
Larrondobuno, Juan & Ihartza, Catalina (1687)
Larrondobuno, Martin & Etxenagusia, Isabel (1710 b.l.)
Larrondobuno, Juan Martin & Gandarias, Maria Ignacia (1717)
Larrondobuno, Martin Manuel & Furundarena, Maria Josefa (1775)
Larrondobuno, Jose Antonio (1830)
Larrondobuno, Manuel Bernardo & Rekondo, Francisca Antonia (1847 b.l.)
Larrondobuno, Jose Antonio & Arbildi, Ramona (1847)
Larrondobuno, Jose Lorenzo, Lazaro, Restituto eta Ana (1851)
Larrondobuno, Ana & Rekondo, Manuel Jose (1871)
Rekondo, Jose Maria eta Juan Jose; Arin, Maria Carmen (1929)
Rekondo, Isabel & Arin (1941)
Arin, Maria Carmen eta Maria Rosario (1969)
Asurmendi Imaz sendia

# 74. Legargain

## Etimologia

Izena *legar* eta *gain* erroak osatzen dute.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Izen berekoa den eta inguruetako bista zabala duen muinoaren magalak sortutako laugune zabal batean, Adunatik gertu.




Hauexek dira bere koordenatuak:
X: 575.575 Y: 4784562 Z: 195
Long. -2º 4′ 10.8′′ Lat. 43º 12′ 33.4′′ Alt. 195

## Deskribapena

Baserri barrokoa da, XVIII. mendearen bukaeran harri-hormaz eta zurezko egituraz eraiki ohi ziren baserrien modukoa. Oinplano angeluzuzeneko etxea da. Harri-horma kare zurituak ditu eta harlanduzko eskantzuak. Jatorrizko baoek ere harlanduzko azpadurak dituzte, beste guztiak arruntak dira. Etxearen antolaketa nahiko homogeneoa da, baina Iparraldetik eta Ekialdetik erantsi zaizkion eraikinek oinplano originala desitxuratu egin dute.
Atzealdeko hormak etxea bi zatitan banatu eta eraikinak gaur egun duen itxura hartu zuen.

Batolome Auzmendi



**Baserriaren kokalekua (1974).**

Joxin Azkue



**Sarrera nagusiko fatxada (2005)**

## Historia

Legargain baserria Aretazpikoa (*"su casa del ganado llamada Legargayn que es anexa"* –1694–) baserriko jabeen aginduz etxebizitza bihurtutako ganadu-borda izan zen. XVIII. mendearen lehenengo hamarkadetan eraiki zuten, eta 1726ko agiriek aipatzen dute baserri hau.
Eraiki eta oso gutxira, jabeek oinordekotza sortzea erabaki zuten, bere ondasunak osotasunean bermatzeko. Gabriel Etxenagusia eta Francisca Antonia Zaldua 1773an ezkondu eta oinordekotza orduan sortu zen: baserriak eta Aretazpikoako oinetxeak osatzen zuten. Dena den, baserri hori ez da gure egunetaraino iritsi zaigun bera. 1767an, aipatutako Gabriel hura mailegu handi bat eskatzera behartuta egon zen, etxea konpontzeko: *"reedificio de la nominada casa de Legargain con motibo de haber sido quemada por yncendio casual"*. Etxea berreraiki eta gero, berriro hondamen bidean utziko du hurrengo mendearen bukaerarekin etorriko den II. Karlistadaren testuinguruak (1871-1875). 1873ko txosten batek esaten du Legargain etxea urte horretan bertan erre egin zutela, Belabietako bataila izenez ezagutzen den hartan izan ziren borrokak direla-eta. Kanpoko egitura konpondu zuten zati batean, eta, batez ere barrualdea. 1943an finkaren erdia saldu egin zuten, eta harez geroztik bitan banatuta egongo da.
Jabeek maiztasunez alokatzen zuten etxea. 1749an, adibidez, Jose Ameztoik 46 dukat, 2 kapoi Gabonetan eta *Yraulcetatik* lursailak ongarritzeko 10 simaur-gurdi garraiatzeko eginbeharra ordaintzen zituen urteko. Mende laurden bat geroago, maizterrak 35 dukat, ahari 1, eta 2 kapoi ordaintzen zituen, eta 1792an 44 dukat eta 2 kapoi ordaindu behar zituen, 3 simaur-gurdi eta artolastozko 6 astinaldi ekarri, karobi zulo bat egin eta 10 sagarrondo landatu.

Joxin Azkue



**Atearen ateburuan kokatu zen zurezko gurutzearen xehetasuna (2005).**



Zizurkilgo Udala

**Aretako Jose Antonio Aranburu eta Legargaingo Alejandro Mendiguren, eskuinean, Zizurkilgo Plazan (1960).**



Zizurkilgo Udala

**Baserriaren ikuspegi orokorra (2000).**



Joxin Azkue

**Baserriaren alboko fatxada (2005).**



Baserriaren atzealdeko fatxada (2009).

## Baserriaren jabeak:

Etxenagusia, Joanes & Beldarrain, Isabel (1694 b.l.)
Etxenagusia, Domingo & Andiazabal, Maria Josefa & Olaskoaga, Antonia (1694)
Etxenagusia, Gabriel & Zaldua, Francisca Antonia (1733)
Etxenagusia, Bernardo & Añorga, Maria Ignacia & Atorrasagasti, Maria Ignacia (1765)
Etxenagusia, Manuel Antonio & San Millan, Juana Francisca (1811 b.l.)
Etxenagusia, Josefa Javiera & Mutiozabal, Jose Miguel (1811)
Mutiozabal, Antonio Maria eta Maria Leona (1840)
Mutiozabal, Jose Miguel (1848)
Mutiozabal, Maria Crispina & Barberia, Pedro (1863)
Barberia, Antonio Maria (1873)
Lasarte, Florencio Nicolas (1943 b.l.)
Ekialdeko ½
Etxabe, Jose Maria & Otegi, Casilda (1943)
Mendiguren, Alejandro & Agirre, Juana (1943)
Mendiguren Agirre sendia
Mendebaldeko ½
Lasarte, Florencio Nicolas (1943)
Etxabe, Primitivo & Kamio, Maria Elenterio (1951)
Etxabe Kamio sendia

# 75. Legarralde

## Etimologia
Izena *legar* eta *alde* (ondoan) erroak osatzen dute.

## Kokapena
Akezko bailaran kokatuta dago.
Asteasu erreka gaineko laugune txiki batean, Asteasuko udalerritik gertu.




Koordenatuak:
UTM: X: 574936; Y: 4782829; Z: 85
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 39.9′′, Lat.: 43º 11′ 37.4′′; Alt.: 85

## Deskribapena

Baserri gotiko-errenazentista da, XVI. mendean edo XVII. mendearen lehen erdialdean eraiki ohi ziren baserri-dolareen modukoa. Ordutik, berrikuntza ugari izan ditu. Oinplano angeluzuzeneko etxea da. Harri-horma kare zurituak ditu eta harlanduzko eskantzuak. Jatorrizko baoek ere harlanduzko azpadurak dituzte (mendebaldeko fatxadakoak eta Ekialdeko fatxadako batzuk), baina beste guztiak arruntak dira. Etxearen antolaketa, oro har, oso homogeneoa eta erregularra da. Jatorrizko eraikinak zurezko egitura du, aurreneko sarbideentzako (gaur itxita) oihal-hormazko egitura, barrualdean oraindik ere ikus daitekeena, batez ere, arkupean, egunotan egin zaion berrikuntza aproposaren ostean.

Denboran zehar etxe zaharrari erantsi zaizkion egiturek desitxuratu egin dute osorik. Erantsi zitzaizkion eraikinen artean interesgarriena hegoaldera jotzen duen fatxadan egindakoa da. Fatxada horrek arku handi bat du, baita sarrera handi bat ere, harlanduz egindako bi zutaberen artean. Zutabe horietako baten erdian gurutze bat dago zizelkatuta, eta hauxe irakur daiteke bertan: *"Alonsso de/ Eizmendi/ A. 1725"*; horrela ematen dizkigu arkupea eraiki zuten urtea eta egiteko agindu zuen errentariaren izena. Ekialdeko fatxada nagusia zarpiatuta dago. Gainera fatxada hori pinoi irekia dauka gainaldean eta oholez erdi-itxita eta bizkarrari eusteko urkila alderantzikatua.

Patxi Otegi



**Baserriaren kokalekua (1987).**

Joxin Azkue



**Fatxada nagusia (2004)**



**Jatorrizko egitura, duela gutxi berritua (2008).**



**Arkupean sartzeko baoa (2010).**



Joxin Azkue

Barrualdean berrikuntzak ugariak izan dira. Hala ere, jatorrizko osagai gehienak mantentzen ditu, bereziki estalkipeko solairuan. Egitura hori atal bateko zutabez osatuta dago. Zutabe horiek habeak eusten dituzte mihiztadurekin beheko solairuan eta enara-buztan erako mihiztadurekin, eta beste batzuk pasaziridun mihiztadurekin estalkipeko solairuan. Solairu horretan barrualdeko trenkada mantentzen da. Trenkada hori itxitako ohol mihiztaduraz eta zurezko egitura duten harlanduzko oihal-hormaz eginda dago. Nabarmentzekoa da, halaber, ekialdeko fatxadako pinoian dagoen urkila alderantzikatua, hor trenkada ahokatuak ikusten dira, geroago beste bat erantsi zitzaion oso antzekoa, barrualdera, bizkarreko habearen finkatzea indarberritzeko.

Baina osagairik interesgarrienak sagardo-dolare izandakoaren lau habeen hondarrak dira, eta solairu horretan baino ez dira mantentzen. Horiek eta gainerako habe guztiek baserri zaharraren egitura osatuko lukete, baina beren egitekoa galdu egin zuten.

## Historia

Legarralde baserria aipatzen da XVI. mendearen bigarren erdialdean (1576). Hala ere, agiriek Sancho de Legarralde abizena duen auzoko baten berri eman dute Zizurkil 1391n Tolosako hiribilduan auzoko egiteko agirian partaide. Beraz, litekeena da eraikina garai hartakoa izatea. Baserri hau Zizurkilen dauden 21 oinetxeetako bat da, beraz, armarria izateko eskubidea du.

1780an, Francisco Irazu Legarraldek oinordekotza sortzeko agindua eman zuen, bere arbasoen memoria ohoratzeko, XVII. mendearen erdialdetik behintzat bertako jabeak izan baitziren, eta hala jarraitu zuten XX. mendearen hasiera arte. Oharretan eraikinak eta bere etxaldeak esparru biribila osatzen zutela esaten da, horregatik pentsa daiteke baserri bihurtutako artzain saroi bat izan zela.

Historian zehar baserriak izan dituen berrikuntzak ugariak izan dira. Independentzi Gerrarekin (1808-1813) lotutako garaian gertakizun ezin txarragoak bizi izan zituen, eta 1818an berrikuntza asko egin behar izan zitzaizkion frantsesek kaltetutako etxeari.

Jabeek maiztasunez alokatuko zuten, hasieran etxe bakar bezala, eta geroago bi zatitan banatuta, diru-sarrerak gehitzeko asmoz. 1703an, adibidez, maizterra zen Juan Eizmendik 60 dukat eta 2 kapoi ordaindu behar zituen urteko, eta 1.000 haritz, 200 gaztainondo eta 100 lizar zituen hazitegia zaintzeko eta karobi bat egiteko betebeharra zuen.

1999an baserria bi etxebizitza independienteetan banatu da.


**Estalkiaren egitura. Atzean, dolareko bi habe pare (2008).**


**Urkila alderantzikatu bikoitza ekialdera jotzen duen fatxadako pinoian (2008).**


**Enara buztan erako mihiztadurak dituen beso baten xehetasuna, goiko partetik ikusita (2008).**

Baserriaren atzealdeko fatxada (2008).



Jatorrizko barne-mihiztadurak, zurezko egitura duten harri-hormazko oihal-hormekin. (2008).

## Baserriaren jabeak:

Legarralde, Juan Perez (1647 b.l.)
Irazu Legarralde, Joanes & Beldarrain, Catalina (1647)
Irazu Legarralde, Miguel & Zumeta, Maria (1689)
Irazu Legarralde, Sebastian & Zaldua, Magdalena (1704)
Irazu Legarralde, Francisco & Goikoetxea, Maria Ascension (1753)
Irazu Legarralde, Juan Bautista & Eizmendi, Juana Josefa (1780)
Irazu Legarralde, Miguel Asencion & Larrarte, Maria Lorenza (1820)
Irazu Legarralde, Juan Ignacio & Tapia, Josefa Ramona (1856)
Irazu Legarralde, Antonia Maria, Severo, Gabriel Saturnino, Juan Rufino eta Sebastian (1902)
Zabala, Santos & Aldari, Felicitas (1924)
Zabala, Jose Antonio (1953)

**Ekialdeko ½**

Eizmendi, Ignacio (1999)
Eizmendi Usandizaga sendia

**Mendebaldeko ½**

Gorostegi, Jose (1999)
Gorostegi Aiestaran sendia

# 76. Lizamuño

## Etimologia

Izena *lizar* eta *muño/buno* (muino) hitzetatik dator. Hainbat izenez aipatzen da dokumentuetan: *Liçabuno* (1623), *Lizarmuño* (1722) edo *Leizabuno* (1754).

**Ustezko baserriaren kokalekuaren ikuspegi orokorra (2010).**

## Kokapena

Mendibailaran auzoan kokatuta zegoen.

Mendi-hegalaren beheko aldeko zelai zabal batean.




ARCHIV. PD. 503-01

1791ko planoa San Millango Jauntxoaren jabetasun mugekin.

## Deskribapena

Gaur egun, ez dago haren arrastorik. Gutxi gorabeherako kokalekua soilik dakigu, eta bertan, ez dago eraikuntza-hondakinik.

## Historia

Lizamuño baserriari buruzko lehen aipamen historikoa XVII. mendekoa da (1623). Zehazki noiz eraikia izan zen ez dakigun arren, baliteke hamarkada gutxi batzuk lehenagokoa izatea.
Hari buruzko dokumentu grafiko bakarra dago, 1791ko plano bat. Bertan, Benezia eta Amabi baserrien artean kokatuta ageri da, Aretazpikoa baserrira bideko hegalaren erdian. Dokumentu horretan adierazten denez, enfiteusi-kontratupean zegoen; eta beraz, Donemiliagako markesari errenta ordaindu behar zitzaion orubea okupatzeagatik, haren lurretan eraikia baitzegoen.
1922an jada *etxe-orube* gisa aipatzen zen. Harrezkero ez da berreraiki, eta erabat ahaztua izan da.



Gutxi gorabeherako kokalekua (2010).

### Baserriaren jabeak:

Alziturri, Pedro & Etxeberria, Mariana (1623)
Alziturri, Magdalena & Añorga, Ascensio & Alkorta, Gracia (1665)
Añorga, Juan Lopez & Zaldua, Maria Rosa (1708)
Añorga, Juan Antonio & Ameztoi, Maria Ignacia (1743)
Añorga, Sebastian Jose (1782)
Añorga, Juan Ascensio & Ezeiza, Maria Ignacia (1804)
Añorga, Martin Antonio & Tejeria, Bernarda & Etxeberria, Maria Fermina (1836)
Añorga, Baltasar & Urrutia, Francisca Antonia (1840)
Añorga, Manuela & Martikorena, Jose (1899)
Urrutia, Francisca Antonia & Añorga (1925)
Añorga, Claudia (1905)

# 77. Lizardi

## Etimologia

Izena *lizar* hitzetik eta *–di* toki-atzizkitik dator, eta lizarrak dauden lekua adierazten du. Eskuarki Lizardi izenez aipatzen bada ere, noizbait *Ipiregui* edo *Ipiribecoa* izenez ere aipatu izan da (1880), etxalde horrekiko duen kokapenagatik.

Joxin Azkue

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.

Hegalaren erdiko zelaigune txiki batean.

Koordenatuak:
UTM: X: 574244, Y: 4785898, Z: 199
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 9.1″, Lat.: 43º 13′ 17.2″; Alt.: 199




Patxi Otegi

Baserria erabat hondatu aurretik (1987).

## Deskribapena

Gaur egun haren hondakinak soilik ikus daitezke. Kokalekuan ez dago etxearen harri-horma zati batzuk besterik, kareztadura oso egoera kaxkarrean dutenak. Oso egikera soila zuen, eta oinplano laukizuzena. Baoek ez zuten zurezko markoa besterik.
1987an zutik zegoen kareztatutako hormadun baserria, oso hondatua zegoen arren.
Haren inguruan zutik dago, oraindik, etxaldeko borda zena. Karobi baten hondakinak ere ikus daitezke.


Joxin Azkue

Baserriaren hondakinak (2006).

## Historia

Lizardi baserriak Irazuazpikoa etxaldearen azienda gordetzeko borda batean du jatorria. 1724an borda aipatzen zen arren, ez zen baserri bihurtu XIX. mendearen hasiera arte: *"una borda reducida hoy a una casería con el nombre Lizardi"* (1862).
Lehenik borda izandako baserria maiorazko baten parte egin zuen Juan Francisco Beldarrainek, 1724an, familiaren ondarea bana ez zedin. Maiorazkoaren parte ziren, halaber, Irazuazpikoa, Irizibar eta Mendigain oinetxeak ere. Eraiki eta urte gutxira etxean ustekabeko sutea gertatu zela aipatzen da, eta ondorioz, berreraikia izan zela (1859).
Etxaldeak beheko solairua, ganbaradun solairua eta eraikinari atxikitako teilape bat zituela aipatzen da 1880an; borda bat zuela ere bai, etxetik hamabost metro ingurura. Eraikina zutik zegoen 1987an, erortzear zegoen arren.


Joxin Azkue

Baserriaren inguruko karobia (2006).

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Jose Antonio & Etxenagusia, Maria Cruz & Barrena, Ana Maria (1814)
Beldarrain, Jose Domingo & Etxeberria, Josefa Ignacia (1830)
Arruti, Miguel & Zalakain, Maria Catalina (1842 b.l.)
Arruti, Juan Bautista & Otegi, Josefa Ignacia (1842)
Arruti, Ignacio Maria & Aranburu, Maria Dolores (1880)
Arruti, Jose Ignacio (1917)
Arruti, Cipriano & Aranburu, Maria Jacinta (1931)
Sagastume, Ignacio eta Eusebio (1959)
Sarasola, Bernardo (1989)
Elosegi, Jose Luis & Arzallus, Maria Arantzazu

## Etimologia

Izena *lohi* (lokaitz) hitzetik eta –*di* toki-atzizkitik dator, eta lohia dagoen lekua edo basatza adierazten du.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Mendi-hegalaren beheko aldeko ikuspegi zabaldun zelaigune batean, eta Adunako udalerriaren mugatik hurbil.




Koordenatuak:
UTM: X: 575964; Y: 4783816; Z: 114
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 53.9″; Lat.: 43º 12′ 9.1″; Alt.: 114

## Deskribapena

Berriki guztiz eraberritua izan den arren, XVII. mendean jasotako jatorrizko eraikinaren zati handiak gordetzen ditu. Gaur egun bereizitako bi bizitzako etxea da. Oinplano laukizuzena du, bistako harri-hormak gordetako zatietan, eta zementuzko plakadunak berreraikitakoetan. Harlanduak ditu eskantzuetan eta jatorrizko baoetako batzuetan; berrietan, aldiz, zementuzko plakak. Hego-mendebaldeko fatxadaren goiko aldean erdi irekitako hormapikoa dago, hari eusten dion egituren zati bat gorde baita. Eraikinaren barruko egitura erabat berritu da.



Loidi sendia

**Fatxada nagusia, hego-mendebaldekoa, berritu aurretik (1988).**

## Historia



Zizurkilgo Udala

**Gabriel Otegi, Loidiko semea, harria jasotzen (1955).**

Zizurkilgo kontzejua hiribildu izendatzeko diruz lagundu zuten etxeetako bat izan zela esanez aipatzen da lehenik *"casa de Loidi"* (1618). Alabaina, Loidi baserriaren historiaren hasiera XVII. mendea baino lehen kokatu ezin den arren, lehenagokoa da ziurrenik. Izan ere, Zizurkilgo jatorrizko 21 oinetxeetako bat da, eta armarria edukitzeko eskubidea du. Jatorrizko eraikinean, hego-mendebaldeko fatxadan, dobeladun arku zorrotza zegoen, berritze lanen ondoren desagertu den arren.

Dokumentazioak ez du ematen etxaldearen garrantziaren berri. Aipatu behar da, ordea, XVIII. mendearen amaieratik hasita hurrengo mendearen zati handi batean, jabeak hainbat auzitan eta hartzekodunen konkurtsotan ibili zirela, jaraunspenaren gaineko zorrei aurre egiteko ezintasuna zela eta. Hori dela eta, zenbait ondasun saldu behar izan zituzten; bai eta baserriaren erdia ere, 1851n.

1886an eraikinak beheko solairua, logelen solairu nagusia, mandioa eta ganbara zituen.



Joxin Azkue

**Ipar-mendebaldeko fatxada, berritu ondoren. Bertan ikusten dira ondoen jatorrizko eraikinaren aztarnak (2004).**



Joxin Azkue

**Baserriaren alboko fatxada (2004).**

### Baserriaren jabeak:

Loidi, Joanes & Aranburu, Maria Miguel (1637 b.l.)
Loidi, Maria & Iturralde, Amador (1637)
Iturralde, Jacinta & Andiazabal, Francisco (1674)
Iturralde, Martin & Ameztoi, Agustina (1697)
Iturralde, Francisco & Zaldua, Mariana (1712)
Iturralde, Martin Jose & Alzate, Maria Francisca (1752)
Iturralde, Jose Antonio & Irazu, Maria Jesus (1779)
Iturralde, Gabriel & Sorozabal, Gabriela Antonia (1819)
Iturralde, Sebastian & Karrera, Manuela Martina (1836)
Laskibar, Juan Francisco (1851/1861)
Laskibar, Jose Celestino & Baztarrika, Francisca (1885)
Laskibar, Maria Dolores eta Teodora Antonia (1947)

**Iparraldeko ½**

Eraunzetamurgil Iraola sendia

**Hegoaldeko ½**

Iraola, Fermin & Otaño, Amparo (1985)
Iraola, Juan & Sanchez, Maria (2002)
Iraola Otaño sendia

# 79. Loidi Errota

## Etimologia

*Lohi* (lokatz) izenak eta *-di* atzizki lokatiboak osatutako izendapena. Lokazti edo lur zingiratsu esan nahi du. Izendapen horri *errota* gehitu zaio, etxea errota baitzen antzina. *Yturraldeco errota* izenaz ageri izan da nonbaiten, 1859. urtean hura eraiki zuenak abizen hura baitzuen.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Adunako errekaren ertzean, eta
Aduna udalerriko mugatik oso gertu.



Koordenatuak:
UTM: X: 576059, Y: 4783849; Z: 71
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 49.7′′; Lat.: 43º 12′ 10.1′′; Alt.: 71

## Deskribapena

XIX. mendean eraikitako baserria. Bata besteari atxikitako eraikinen multzoa. Eraikin nagusiaren oinplanoa angeluzuzena da. Karez zuritutako harrizko hormak ditu. Harlanduzko eskantzuak ezkutatzen ditu kareak. Bao bakunak ditu, berdintsu banatutakoak. Eraikin nagusi horretan errota kokatu zen. Bigarren eraikina eraikin nagusiari atxikita dago, iparraldean. Nagusia baino askoz egikera soilagoa du. Karez estalitako harrizko hormak eta silarrixkazko eskantzuak dauzka. Eraikin nagusiarekiko perpendikular dagoen bigarren eraikin horrek zentral hidroelektriko txikia zuen barruan. Ekialdean, ordea, material modernoekin egindako beste eraikin bat egin zen, nekazaritza- eta abeltzaintza-funtzioetarako soilik. Eraikin horren barruan ur-errota dago eta haren funtzioek eraikin horren banaketa eta egitura baldintzatu dute. Haren ipar eta mendebaldean, berriz, beste bi eraikin egin dira.


Joxin Azkue.

**Baserriaren alboko fatxada (2004).**

Eraikinaren barruko egitura, bestetik, errotik aldatu da. Jatorrizko zurezko pieza gehienen ordez, esaterako, hormigoizko piezak jarri dira. Eraikin nagusiaren beheko solairuan, alabaina, errota zaharreko makinetako asko gorde dira. Zentraleko makinak, berriz, desagertu egin dira. Zurezko egitura teilatupeko oinean gorde da, ez beste inon. Egitura hori oso bakuna da: txineladun zutikoek goihabeari eusten diote, eta astazaldiek perimetro-paretarekin lotzen dituzte zutiko horiek.

## Historia

1862. urteko espediente batean, hauxe adierazi da mintzagai dugun eraikinari buruz *"el molino harinero que construyo el mismo en el año de mil ochocientos y cuarenta y ocho"*. Sebastian Iturraldek eraiki zuen errota hura, Loidi baserritik gertu aurkitzen den soro batean. Artoa ehotzeko bi harri pare zituen barruan. Errotaren eta zentralaren ekoizpen-azpiegitura gehienak, edonola ere, ia guztiz desagertu dira.

XIX. mendearen amaieran, Fermin Iturraldek –Sebastianen semeak– instalazioak berregokitu zituen. Uraren indarra, gehienbat, energia elektrikoa sortzeko erabili zuen, ehotze-lan urria baitzegoen. Beraz, errota zaharrari atxikitako eraikin berria egin zuen Fermin Iturraldek, eta eraikin berri horretan zentrala kokatu. Zentral berri horrek makina-aretoa zuen, paladun gurpila, turbina, eta guzti. 1914. urtean, 4 zaldiko indarra sortzen zuen zentral horrek. Zenbait urte geroago –1919an– zentraleko elikatze-sistema hidraulikoaren azpiegituran berrikuntza handiak egin zituen Jose Joaquin Aiestaran-ek. Alde batetik, lehen baino emari handiagoa lortzeko asmoz, presa berria egin zuen ibaian, jatorrizkoa baino gorago. Bestetik, ura airetik eramateko sistema konplexua ezarri zuen. Sistema horretako tutuei eusten zieten zutabeak eraikinaren inguruan ikus daitezke egun ere. Gutxienez, 1960ko hamarkadara arte izan zen martxan zentral hori.


Patxi Otegi

**Zentral hidroelektriko zaharraren eraikina, kanalizazioak bere horretan zituela (1987).**


Joxin Azkue

**Zentralera ura airetik eramateko kanalizazio zaharren zutabeak (2006).**



**Baserriaren atzealdeko fatxada (2008).**



## Baserriaren jabeak:

Iturralde, Sebastian & Karrera, Manuela Martina (1848)
Iturralde, Fermin (1881)
Aiestaran, Jose Joaquin & Mendizabal, Maria Francisca (1919)
Etxabe, Jose Manuel (1931)
Tapia, Jose Vicente & Lertxundi, Clara (1931)
Tapia, Francisco, Andoni eta Julian (1976)
Tapia, Elena Elvira
Tapia Galarza sendia

**Estalkiaren egitura: zutikoak erdian, eta inguruko hormetan bermatutako astazaldiak (2008).**



**Errota zaharraren makinak, bi errotarri-pareak artean (2008).**

## Etimologia

*Lu/lur, zuri* izen-adjektiboak eta *-aga* atzizki lokatiboak osatutako izena. Lur zuriko lekua esan nahi du.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago.
Villabona eta Asteasu lotzen dituen
bidetik gertuko ibai-lautada handi batean.




Koordenatuak:
UTM: X: 575375; Y: 4782675; Z: 71
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 20.6″; Lat.: 43º 11′ 32.3″, Alt.: 71


Patxi Otegi

**Baserriaren fatxada nagusia, eraikina abandonatu aurretikoa (1987).**

## Deskribapena

XVIII. mendearen erdialdean eraikitako baserria da. Zurezko egitura du eta harriekin egina dago. Eraikina abandonatuta eta erortzeko zorian dago egun. Teilatuaren parte bat eta hormetako batzuk, esaterako, lurrera erori dira. Oinplano angeluzuzendun eraikina da. Harrizko paretak ditu, eta horiek estaltzen dituen karea oso hondatuta dago. Eskantzuak eta jatorrizko eraikineko hainbat elementu, berriz, harlanduzkoak dira. Eraiki ondotik bao txikiren bat egin bazaio ere, baserriko baoak, oro har, berdintsu banaturik daude, era homogeneoan. Guztietatik arreta gehien deitzen dutenak hego-ekialde eta ipar-ekialde fatxadetako sarrera-baoak dira. Erdi-puntuko arku dobeladun beheratuak dira bao horiek. Ipar-ekialdeko fatxadako baoaren zati bat, esaterako, itsututa dago.

Ia guztiz erorita dagoenez, barruko egituraren ezaugarriak zein ziren ez dakigu.



**Baserrira sartzeko baoa (2009).**

## Historia

XVI. mendearen bigarren erdialdeko (1578. urteko) idatzi batean ageri da Luzuriaga baserria estreinakoz. 1391. urtean, edonola ere, Zizurkil Tolosa hiribilduko auzo bihurtzeko agiria sinatu zen. Ekitaldi hartan Ihoan de Luçuriaga izeneko bizilagun batek hartu zuen parte. Hortaz, baliteke garai hartan mintzagai dugun baserria existitu izana. Zizurkilgo jatorrizko 21 oinetxeetako bat dugu baserri hori. Beraz, armarri heraldikoa du.

XVIII. mendearen erdialdean, eraikina zela-eta, jabeek zor asko zituzten eta, agintariek eraikina bahitzearen beldur, hura saldu behar izan zuten. Eremu hartan higiezin ugariren jabe (Errekalde, Amabi, Kamioaundi baserrien eta Asteasu nahiz Villabonako beste hainbat etxalderen jabe) zen Gabriel Ameztoik erosi zuen mintzagai dugun baserria 1768. urtean. Hura izango zen, ziur aski, baserria berreraiki eta egun ezagutzen dugun itxura eman ziona. Haren seme Martin Jose Ameztoi 1776. urtean ezkondu zenean, mintzagai dugun baserri hau eta bere ondarea osatzen zuten gainerako beste higiezin guztiak eman zizkion ezkonsaritan. Emakida horren bidez, oinordetza horren segurtasuna bermatuko zuen maiorazkoa sortzea zen Ameztoiren asmoa.

Urte horretan, hots, 1776an, 20 anega gari, 40 anega arto eta 2 kapoi ematen zituen baserriko maizterrak urteko errenta moduan. 1835. urtetik aurrera, urteko errenta horren parte bat dirutan eman behar zuen maizterrak: 18 anega gari, 36 anega arto, 300 erreal, eta 2 kapoi.

1887. urtean, esaterako, baserriak hiru solairu zeuzkan. Beheko solairuan bi sukalde, logela 1, 2 ukuilu, eta atalondoa zeuden. Lehenengo solairuan, berriz, 2 logela, aletegia, ganbara, eta lastategia. Bigarren solairuan, azkenik, ganbara.




GAO. JDIM. 2-7-105

**Villabonatik Asteasu eta Zizurkilerako bide berriaren trazatuaren planoa (1781. urtekoa).**

## Baserriaren jabeak:

Luzuriaga, Gracia & Azkarate, Luis (1578)
Luzuriaga, Pedro & Larrondobuno, Maria Joanes (1590)
Etxeberria Luzuriaga, Jose (1637)
Luzuriaga, Juan Miguel & Iriondo, Maria Ascension (1659)
Luzuriaga, Maria Miguel & Larrondobuno, Juan (1709)
Larrondobuno, Gabriel Felix & Saizar, Maria (1736)
Luzuriaga, Maria Miguel & Larrondobuno, Juan (1752)
Etxeberria Otazu, Mª Ascension & Aialde, Pedro Ignacio & Etxenagusia, Cayetana (1756)
Aialde, Miguel Antonio eta Martin (1762)
Ameztoi, Gabriel & Zaldu, Maria Ignacia (1768)
Ameztoi, Martin Jose & Laskibar, Maria Micaela (1776)
Ameztoi, Manuel Fermin & Ihartza, Atanasia (1822)
Ameztoi, Jose Benito (1862)
Ameztoi, Luisa (1905)
Juanmartiñena, Maria Concepcion (1945)
Urbieta Deriozpe sendia

## Etimologia

Antza denez, *makur* (sasi, lahar) hitzetik dator. *Makurra* gisan ere aipatuta agertzen da.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Hegi baten erdian, San Miguel ermitako bidegurutzetik gertu.




Hauexek dira bere koordenatuak:
UTM: X: 575.716 Y: 4.783.771; Z: 124
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 4.9′′; Lat.: 43º 12′ 7.7′′; Alt. 124

## Deskribapena

XX. mendearen hasieran berreraikitako baserria, Gerra Zibilean jasandako sutearen ostean. Oinplano angeluzuzeneko eraikina eta bi isurkiko estalkia, fatxada nagusiarekiko perpendikularra den gailur batekin. Kanpoko hormak harrizkoak dira, zarpeatuta eta karez zurituta, fatxada nagusiaren aurreneko bi oinak izan ezik, bistako harrizkoak dira. Baoak berdintsu banatuta daude, oso era erregularrean.



Patxi Otegi

**Baserriaren ikuspegi orokorra elurpean (1987)**

Barne-egitura goitik behera berritua izan da, eta estalkipea zurezko zutikoetan oinarrituta dago goihabeari eusten dioten zapatekin, eta horma perimetraletarainoko gailurrekin ere.
Hainbat eraiketa dauzka atxikita, horiek ere egikera berrikoak.

## Historia

Makura baserriari buruzko lehen aipamena XVIII. mendearen hasierakoa da (1722). XIX. mendearen hasieran, berriz, San Millan markesaren jabetza-multzo handiko zati gisa agertzen da.
1815ean, etxea 50 urtez alokatu zitzaion Maria Ignacia Iraolari, honako alokairu honen truke: 12 anega gari, 132 erreal eta bi kapoi (1835. urtean 9 anega gari eta 99 erreal izan ziren).
Baserriaren historia azken 130 urteetan hurrenez hurreneko bi suntsipenek markatu dute. Lehena II. karlistaldian (1873-1875), txiki-txiki eginda geratu zen (1885ean hauxe aipatzen da: *"fue quemada no están más que los restos de paredes"*). Eta gauza bera gertatu zitzaion Espainiako Gerra Zibilaren garaiko borroken ondorioz, jabe berriek 1940. urtean berriz eraiki zuten arte.

Zizurkilgo Udala

**Baserriaren fatxada nagusia (2000).**



Zizurkilgo Udala

**Goenaga Mendizabaldar sendiak bertako alabak Pakita eta Juanitaren ezkontza egunean (1965).**



Zizurkilgo Udala

**Iñaki Goenaga lehenengo meza eman ondoren. Berarekin Adrian eta Modesto Goenaga eta Consuelo San Sebastian (1965).**



Zizurkilgo Udala

**Milagros eta Adrian Goenaga (1967).**



Zizurkilgo Udala

**Milagros eta Felix Goenaga anai-arrebak (1967).**



Zizurkilgo Udala

**Mariana Otaño bere bilobak Pakita eta Juanita Makurara etorri berriak (1945).**

Baserriaren ganbarako egitura (2008).

Joxin Azkue



Baserriaren alboko fatxada (2005)

## Baserriaren jabeak:

Agirre, Miguel & San Millan, Teresa (1722)
Agirre, Andres & Etxabe, Sebastiana (1736)
Agirre, Francisco Antonio & Roteta, Catalina Teresa (1763)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1803)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Goenaga, Jose Manuel & Mendizabal, Maria Josefa (1940)
Goenaga, Felix & Tena, Uxune (1967)
Goenaga Mendizabal sendia

## Etimologia

*Malkar* (lursail latza). Haitzez betetako toki aldapatsuan kokaturik dago baserria. Beraz, baliteke izena hortik hartu izana.

Joxin Azkue

**Uztezko baserriaren kokalekua ikuspegi orokorra (2005).**

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta zegoen. Malkorgaña muinoaren hegaleko zelaigune batean, Asteasu udalerritik metro gutxi batzuetara.

Koordenatuak:
UTM: X: 574387; Y: 4783243; Z: 130
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 4.1″; Lat.: 43º 11′ 51.1″; Alt.: 130





Antzina baserria zegoen lekua (2005).

## Historia

Bengoetxea (1615) baserri hurkoko borda bat zen Malkorra baserria *("casilla de ganados")*. XVIII. mendeko lehen hamarraldietan, borda hura berreraiki eta baserri bihurtu zuten. Garai hartan, Antonio Elizondo eta María Josefa San Millán mintzagai dugun baserriaren jabe ziren. Horien seme eta oinorde Gabriel Elizondoren ezkontza zela-eta, Malkorra baserria Bengoetxea oinetxearen maiorazkoari gehitzea erabaki zuten senar-emazte horiek (1747).

Baserria bi etxebizitzetan zatitu zuten 1853. urtean. Eraikinak behe solairua, lehen solairua eta ganbara zeuzkan (1865).



Baserriaren kokalekua erakusten duen airetik hartutako argazkia (1954).

## Deskribapena

Desagertuta dago egun. Hor-hemenka, zenbait harri-bloke solte daude, antzina baserria zegoen lekuan. Beraz, baserri haren ezaugarriak zein ziren ez dugu jakiterik.



Antzina baserria zegoen lekuaren xehetasuna (2005).

## Baserriaren jabeak:

Elizondo, Joanes (1745 b.l.)
Elizondo, Antonio & San Millan, Maria Josefa (1745)
Elizondo, Gabriel & Beldarrain, Maria Ignacia (1750)
Elizondo, Miguel Antonio (1779)
Elizondo, Jose Domingo & Erauskin, Maria Jesus (1789)
Elizondo, Juan Fermin (1836 b.l.)
Elizondo, Nicolas Maria & (1836)
Bengoetxea, Jose Manuel & Argaia, Maria Bautista & Sorozabal, Concepcion (1853 b.l.)
Baserri ½
Bengoetxea, Maria Bautista & Arrillaga, Francisco Ignacio (1853)
Arrillaga, Ascensio (1895)
Baserri ½
Bengoetxea, Maria Antonia & Aizpurua, Jose Manuel (1853)
Aizpurua, Maria Joaquina (1865)

## Etimologia

*Mendi* eta *gain* partikulek osatutako izena.

**Ustez baserria kokatzen zen tokiaren irudi orokorra –pilotalekua– (2010).**

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta zegoen.
Egun pilotalekua dagoen lekuan.



Fototeka Kutxa



**Zizurkilgo herrigunea airetik ateratutako argazkia. Eliza, udaletxea, eta Larretin arteko lursailean zegoen baserria (1970-1980 hamarraldia).**

## Deskribapena

Gaur egun baserri hori desagertuta egon eta haren arrastorik ez badago ere, pilotalekua egun kokatzen den lekuan hor nonbait zegoela dakigu.

## Historia

Mendigain baserriari buruzko lehen aipamena XVII. mendearen hasierakoa da (1618). Urte hartan, Zizurkilgo Kontzejuak diru-bilketa egin zuen hiribildu titulua lortzeko, eta diru-ekarpenak egin zituzten baserrien zerrendan *"la casa de Mendigain"* ageri da. Eraiki, ordea, ez dakigu zer urtetan eraiki zen.

Mendigain baserria, Irazuazpikoa oinetxea, Irizibar oinetxea, eta Lizardi borda (gerora baserri bihurtuko zena) Juan Francisco Beldarrainek eta Magdalena Zabalak sortutako maiorazko berriaren barruan sartu ziren 1724. urtean. Familiaren sona handitzeaz gain, maiorazkoaren bidez oinordeek ezin izango zituzten ondasunak banatu eta, ondorioz, ez ziren haien kontura auzitan ibiliko.

II. Gerra Karlistan (1871-1875) eremu hartan gertatutako gudateetako batean etxea erre egin zuten, *"fue reducido a cenizas en tiempo de la última Guerra Civil"*, 1873ko idatzi batean adierazten denez. Orduz geroztik, eraikina berreraiki zela adierazten duen daturik ez da. Eraikina, beraz, apurka-apurka erori zen, haren arrasto oro desagertu arte.

## Baserriaren jabeak:

Irizibar, Martin & Irazu, Marina (1553)?
Irazu, Maria Andres & Beldarrain, Francisco (1646)
Beldarrain, Joanes (1660)
Beldarrain, Miguel (1670)
Beldarrain, Francisco (1690)
Beldarrain, Juan & Zabala, Magdalena (1737)
Beldarrain, Juan Bautista & Alzate, Maria Antonia (1745)
Beldarrain, Jose Antonio & Etxenagusia, Maria Cruz & Barrena, Ana Maria (1775)
Beldarrain, Jose Domingo & Etxeberria, Josefa Ignacia (1830)
Beldarrain, Jose Ignacio & Irazu, Juana Ignacia (1865)
Olano, Baltasar & Bengoetxea, Maria Francisca (1876)
Mendizabal, Baltasar Antonio & Alkorta, Josefa Antonia (1908)
Mendizabal, Antonio & Mendizabal, Ines (1929)
Mendizabal, Maria Concepcion, Jose Mari & Maria Milagros (1976)

# 84. Miranda

## Etimologia
Miranda abizena oso zabaldua badago ere, ez dakigu zein izan daitekeen haren etimologia.

Joxin Azkue

## Kokapena
Irazu bailaran kokatuta dago.
Mendi-hegalaren erdiko zelaigune zabal batean dago.

Koordenatuak:
UTM: X: 574172, Y: 4783898; Z: 145
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 13.2′′; Lat.: 43º 12′ 12.4′′; Alt.: 145




Patxi Otegi

Fatxada nagusiaren irudia, azkenekoz berritu aurretikoa (1987).



Joxin Azkue.

Bao baten harlanduzko markoaren irudia (2005).

## Deskribapena

Goitik behera berritu berria (1994 inguruan). Oinplano karratua du. Material modernoz egina dago. Barruko nahiz kanpoko aldean ez dago jatorrizko baserriaren arrastorik (harlanduzko markoren bat izan ezik).

## Historia

Miranda baserriari buruzko lehen aipamena XVII. mendearen hasierakoa da (1618). Urte hartan, Zizurkilgo Kontzejuak diru-bilketa egin zuen hiribildu titulua lortzeko, eta diru-ekarpenak egin zituzten baserrien zerrendan *"la casa de Miranda"* ageri da. Eraiki, ordea, ez dakigu zer urtetan eraiki zen.

1789. urtean, Pedro Zamurzena-ri alokatu zion etxea jabeak. Maizterrak 30 dukat eta 2 kapoiko errenta eman behar zion urtero. Mende erdi igaro ondoren, hots, 1829an, errenta igo egin zen: 48 dukat eta 2 kapoi.

XIX. mendearen amaieran, hau da, 1870ean, beheko solairua, lehenengo solairua eta ganbara zeuzkan eraikinak. Horrez gain, lanabesak gordetzeko etxola bat zegoen baserri hartatik gertu.

## Baserriaren jabeak:

Luzuriaga, Joanes & Etxabe, Mariana (1622)
Bengoetxea, Gabriel (1752)
Irazu, & Goienetxea, Maria Josefa (1784)
Baserriaren 3/4ak
Rekondo, Juan Antonio (1829)
Ipinza , Pedro Fermin & Zubeldia, Maria Luisa (1841)
Ipinza , Maria Ignacia & Zarauz, Juan Jose (1841)
Baserriaren ¼a
Irazu, Jose Antonio (1829)
Udakiola, Francisco (1848 b.l.)
Illarramendi, Francisco & Gesalaga, Joaquina (1848)
Zarauz, Juan Jose & Ipinza, Maria Ignacia (1861)
Baserri osoa
Ziganda, Felipe & Muriel, Consuelo (1994 b.l.)
Garcia, Oscar & Bakero, Amaia
Baserri ½
Aizpurua, Candido
Baserri ½
Aizpurua, Santiago & Etxeberria, Alazne
Aizpurua Ipinza sendia

# 85. Mugiroberri

## Etimologia

Izena honako hitz hauetatik eratorri da: *muga*, *iro/irazu* (iratzea) eta *berri*. Agirietan *Muguiroverria* agertzen da, inguru horretan dagoen beste homonimo batetik bereizteko; jendearen artean, berriz, Mugiberri izenez da ezaguna.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta zegoen.
Zehazki, mendi-mazelaren erdialdean kokatzen da, Etxeberrigaña muinoaren tontorretik gertu.



Koordenatuak:
UTM: X 575964; Y: 4783314; Z: 164
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 54.1′′, Lat.: 43º 11′ 52.8′′, Alt.: 164




**Baserriaren arrastoak (2005).**

## Deskribapena

Baserria eraitsita dago egun, desagertuta. Haren lekuan, harrimultzo bat baino ez da ikusten, hura deskribatzea eragozten duena.




**Baserriaren arrastoak (2005).**

## Historia

Mugiroberri baserria abereentzako borda zahar bat zen jatorriz, Etxeberritxikia baserritik gertu zegoena; azken hori, hain zuzen, jada aipatu zuten 1623. urtean (*"la casa de Echeverria y su borda o casa de ganado"*). Borda hori, ordea, baserri bihurtu zuten, XVII. mende amaierako edo XVIII. mende hasierako urteren batean; 1708. urterako, jada, eraikita zegoen.

1882. urtean, berriz, eraikina definitu zuten: *"solar de casa incendiada"*. Sute hura, ziur asko, amaitu berria zen II. Karlistaldiaren testuinguruan gertatuko zen; gertaeraren ondoren, ordea, ez zuten berriro eraiki.

## Baserriaren jabeak:

Agirre, Miguel (1650)
Añorga, Ascensio & Altziturri, Magdalena & Alkorta, Gracia (1708)
Añorga, Francisco & Agirresarobe, Catalina (1709)
Añorga, Mariana, Antonia eta Maria Josefa (1742)
Alliri, Manuel Jose & Mujika, Josefa Antonia (1850 b.l.)
Alliri, Martin Felipe & Lizarraga, Juana Micaela (1850)
Etxearen orubea (1882)
Alliri, Manuel & Etxebeste, Maria (1886)
Mendizabal, Martin & Beloki, Eugenia (1892)
Mendizabal , Jose Maria & Alberdi, Maria Filomena (1924)
Mendizabal , Antonio & Larrarte, Maria Jesus (1961)
Zugasti, Jesus Maria & Ormazabal, Maria Pilar (1982)
Carpintería Zugasti S.A. (1976)

# 86. Mugirozar

## Etimologia

Izena honako hitz hauetatik eratorri da: *muga*, *iro/irazu* (iratzea) eta zar (zahar). Lehenengo aldiz, *Muguiro* izena soilik aipatu zen, eta, XVIII. mendetik aurrera, *Muguirozarra* izena hartu zuen, gerora bertatik gertu eraiki zuten homonimotik bereizteko. Jendeak Muizar deitzen dio.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Laugune batean aurkitzen da, Etxeberrigaña eta Urkamendi muinoen artean.

Koordenatuak:
UTM: X: 575783; Y: 4783195; Z: 162
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 2.2′′; Lat.: 43º 11′ 49′′; Alt.: 162




Patxi Otegi

Mugirozar baserria suntsitu aurretik (1987).

## Deskribapena

Oin berriko baserria orain gutxi eraberritu dute, 1997. urtean izandako sutearen ondoren. Eraikinak material modernoekin egindako oin karratua du, eta ez du gorde jatorrizko eraikinaren arrastorik.
Aurreko eraikinak oinplano angeluzuzena eta harlanduzko eskantzuak zituen; fatxadako zenbait baoren ertzak, halaber, harlanduz apainduta zeuden. Gainerakoak, dirudienez, ez zuen garrantzirik. Etxearen fatxadetan, egurrezko armazoi berezi-berezia ikus zitekeen.

## Historia

Mugirozar baserria XVII. mendearen hasieran aipatu zuten lehenengo aldiz; zehazki, Zizurkilgo Udalak hiribildu-titulua lor zezan ordaindu beharreko kostuari aurre egiteko diruz lagundu zuten baserrien zerrendan agertzen da: *"la casa de Muguiro"* (1618).


Julian Arrastoa

Baserria erre ondorengo arrastoak (1997).

XIX. mendearen erdialdera, jatorrizko eraikina eraberritu egin zuen orduko jabeak, Sebastian Iturraldek; ziur aski, eraikin hori bera izango da ia gaur egunera arte iritsi dena. 1990eko hamarkadaren amaieran, eraikinak su hartu zuen ezustean, eta erabat kiskali zen; haren ondoren, berriro berreraiki zuten (2003).


Julian Arrastoa

Baserrira sartzeko baoaren zenbait xehetasun, hark su hartu eta gero (1997).

## Baserriaren jabeak:

Azterain, Nicolas (1648)
Azterain, Juan & Beraza, Ana Maria (1694)
Azterain, Ignacio Francisco & Iturralde, Manuela (1743)
Iturralde, Martin Jose & Alzate, Maria Francisca (1752)
Iturralde, Jose Antonio & Irazu, Maria Jesus (1779)
Iturralde, Gabriel & Sorozabal, Gabriela Antonia (1819)
Iturralde, Sebastian & Karrera, Manuela Martin (1836)
Iturralde, Fermin (1910 b.l.)
Mendizabal, Jose Maria & Alberdi, Maria Filomena (1910)
Mendizabal, Antonio & Larrarte, Maria Jesus (1961)
Mendizabal, Juan Maria (1975)

# 87. Mutio

## Etimologia

Ez dago Mutio baserriaren etimologiari buruzko ziurtasunik, baina zenbait autorek muinotzat hartu du.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Herrigunetik gertu dago, laugune zabal baten muturrean.



Koordenatuak:
UTM:X: 575506; Y: 4783439; Z: 121
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 14.4″; Lat.: 43º 11′ 57″; Alt.: 121



Patxi Otegi

**Baserriaren fatxada nagusia, eraberritu aurretik (1980).**

## Deskribapena

Baserria goitik behera eraberritu dute orain dela gutxi, (1986). Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, material modernoekin egina, eta ez kanpoaldean, ez barnealdean ez du gordetzen jatorrizkoaren aztarnarik.



GAO. OA. 6759

**Zizurkilgo antzinako argazki baten xehetasuna, baserria erdian dagoela (1910-1920).**



**Egungo baserriaren fatxada nagusia (2009)**

## Historia

Mutio baserriari buruzko lehen datu historikoa XVI. mendearen amaierakoa da (1575). Nolanahi ere, horren aurretik, Petri de Mutio abizena zuen auzotar bat aipatzen da zenbait agiritan, Zizurkilgo larredien jabetza zela-eta egindako itunean parte hartu zuena (1475); ordurako, beraz, baserria eraikita egongo zen, ziur asko.

Dena den, agiriek ez dute baserri honi buruzko datu garrantzitsurik ematen. 1870ean, eraikinak behe-solairua eta beste bi solairu zituen.



**Kokapenaren ikuspegi orokorra (2009).**

## Baserriaren jabeak:

Mutio, Bernat (1575)
Mutio, Maria Juaniz & Mendigarai, Bernabe (1608)
Mendigarai, Joanes (1648)
Mendigarai, Antonio & Luzuriaga, Maria & Larrondobuno, Maria Josefa (1659)
Mutio, Joanes (1691)
Mutio, Gabriel & Beldarrain, Magdalena (1696)
Mutio, Juan & Karrera, Maria Magdalena (1741)
Mutio, Maria Concepcion & Gandarias, Sebastian (1754)
Gandarias, Maria Josefa & Atorrasagasti, Juan Bautista (1779)
Gandarias, Maria Magdalena & Etxabeguren, Domingo Ignacio (1784)
Etxabeguren, Sebastian & Aldalur, Maria Manuela (1799)
Etxabeguren, Alejandro Ignacio (1808)
Etxabeguren, Josefa Antonia & Irazusta, Jose Antonio (1840)
Lertxundi, Miguel Antonio & Etxeberria, Juana Francisca (1853)
Lertxundi, Francisco & Etxenagusia, Salvadora (1888)
Lertxundi, Miguel Jose (1907)
Lertxundi, Romana & Beloki, Agustin (1908)
Beloki, Romana eta Benita (1942)
Zubeldia, Jose Maria (1972)
Aburuza, Pedro Maria & Labaka, Maria Jesus (1986)
Aburuza Labaka sendia

# 88. Nekola

## Etimologia

Ez dago Nekola baserriaren etimologiari buruzko ziurtasunik, baina zenbait autorek ibar-eremua hartu du oinarri.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Ikuspen oneko laugune zabal baten gainean.

Koordenatuak:
UTM: X: 574519; Y: 4783477; Z: 103
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 58.1′′, Lat.: 43º 11′ 58.6′′; Alt.: 103



## Deskribapena

Baserri barrokoa da, armazoidun baserriaren tipologiakoa; XVII.-XVIII. mendean eraikitako ataripea du. Bi konpartimendutan dago bereizita, bi etxetan; horren ondorioz, etxe bakoitzak bere bilakaera izan du. Horrez gain, atal nagusiari itsatsita, hainbat eta hainbat eranskin eraiki dira, eta, horrenbestez, multzoa erabat lausotu da. Eraikinak oin angeluzuzena du, kareztatutako harri-hormekin; eskantzuetan eta jatorrizko bao gehienetan, berriz, harlandua dago, baina gainerakoek ez dute garrantzi berezirik.

Etxera sartzeko jatorrizko bidea hegoaldera ematen duen fatxadaren mendebaldeko zatian dago: erdi-puntuko arkua du, harlandu dobelatuko arku batez osatua. Fatxada beraren ekialdeko zatian, ezaugarri bertsuko beste arku bat dago, baina egikera sinpleagoa duena; gainera, baliteke azken hori beranduagokoa izatea. Egun, etxera sartzeko erabiltzen da; baina, hasiera batean, ataripe batera eramaten zuen. Hori, seguru asko, irekita egongo zen behesolairuko erdiko zatian, eta harri-hormatxo jarraitu bat izango zuen euskarri; eskantzuekin errematatuta egongo zen, eta goiko zatia harlanduzko zutabe baten edo hainbaten gainean pausatuko zen, Aretazpikoa eta Aretagoikoa baserrietan ikusi ahal izan den bezala. Egun, hala ere, oso desitxuratuta eta partzialki itsututa dago (hormaz estalita). Goiko aldeari dagokionez, ataripe horretan egurrezko armazoi osoa izango zen, horma-oihal erregular samarrak osatuz; ziur aski, gainerako fatxadetara ere hedatuko zen, nahiz eta hori ziurtatzerik ez izan.


Zizurkilgo Udala

**Baserriaren hegoaldeko fatxada (2000).**


Bartolome Auzmendi

**Ekialdera ematen duen fatxada, egurrezko armazoiarekin; bestalde, ataripearen egitura erdi itsua da beheko aldean (1974).**



**Ataripera sartzeko baoa, hegoaldera ematen duen fatxadan (2008)**

## Historia

Nekola baserriari buruzko lehen datu historikoa XVI. mendearen erdialdekoa da (1553). Nolanahi ere, horren aurretik, Rumes de Necola abizeneko auzotar baten berri agertzen da zenbait agiritan, Zizurkil Tolosa hiribildura biltzeko akta batean (1391); dirudienez, ordurako eraikita egongo zen.
1749an, Miguel Ignacio Atorrasagastik eta Maria Antonia Ezeizak zituzten jabetzen maiorazko bat eratzea erabaki zuten, familia-ondare haren osotasuna bermatu ahal izateko. Esleitutako ondasunen artean daude, besteak beste, Nekolako oinetxea bere teileriarekin, Zalduzarkoa eta Sarobekoa, bai eta Lasako oinetxea ere (Asteasu).
1857an, maiorazko horren jabeak hartzekodunen konkurtso batean zeuden murgilduta, eta hainbat jabetza bahitzeko mehatxua zuten; hori dela-eta, bi multzo bereiztea erabaki zuten. 1. multzoa Nekola etxearen ekialdeko zatiak, horren teileriak eta Sarobe etxeak osatu zuten, eta Manuela Josefa Urkolari eman zitzaion, maiorazkoaren sortzaileen oinordeko zelako. 2. multzoa, berriz, Nekola baserriaren beste erdiak eta Zalduzarkoak osatu zuten; bigarren multzo hori, hain zuzen, zorren zenbatekoa kitatzeko aplikatu zen. Beraz, baserri hori bitan banatu zuten, erdian horma bat eraikiz; horrez gain, eraikinaren zenbait eremu zahar aldatu egin zituzten, beste funtzio batzuetarako.


Zizurkilgo Udala

**Praxku Alkorta, Mikaela Alkorta eta Mariana Usabiaga (erdian), baserriaren atarian (1940).**


Zizurkilgo Udala

**Iñaxi Bengoetxea eta Bittori Agirrezabala, zutik, baserriaren atariaren aurrean. Makurtuta: Angeles Erkizia, bere alabekin: Jaxone, Ana Jesus eta Mari Jose Agirrezabala (1971).**


Zizurkilgo Udala

**Praxku Alkorta eta Iñaxi Aranburu, etxeko atarian, seme-alabekin: Juani, Ana Mari, Milagros, Xabino eta Joxe Mari (1960).**


Zizurkilgo Udala

**Jesus Agirrezabala eta Angeles Erkizia, beren alabekin: Ana Jesus, Mari Jose eta Jaxone Agirrezabala (1973).**


Zizurkilgo Udala

**Praxku Alkortaren eta Iñaxi Aranbururen ezkontza (1945).**




Baserrira sartzeko, antzinako bao nagusi bat dago, hegoaldera ematen duen fatxadan (2008).

## Baserriaren jabeak:

Nekola, Maria (1553 b.l.)
Nekola, Joanes (1553)
Beldarrain, Joanes (1652)
Beldarrain, Bartolome & Andiazabal, Graciana (1702)
Beldarrain, Maria Francisca & Atorrasagasti, Pedro (1717)
Atorrasagasti, Miguel Ignacio & Ezeiza, Maria Antonia (1735)
Atorrasagasti, Ana Maria (1757)
Atorrasagasti, Maria Ignacia Antonia & Etxenagusia, Bernardo (1761)
Atorrasagasti, Maria Ignacia Antonia & Etxenagusia, Bernardo (1761)
Etxenagusia, Maria Josefa & Urkola, Francisco Javier (1789)
Urkola, Jose Ignacio & Larrunbide, Maria Rita & Aranburu, Maria Antonia (1820)
Urkola, Manuela Josefa & Alkorta, Juan Francisco (1852)

Ekialdeko ½
Urkola, Manuela Josefa & Alkorta, Juan Francisco (1852)
Usabiaga, Francisco (1867 b.l.)
Usabiaga, Maria Antonia (1867)
Usabiaga, Felipa & Mendia, Martin Jose (1883)
Sarabe, Martin (1920)
Alkorta, Juan Maria & Usabiaga, Mariana (1920)
Alkorta, Francisco & Aranburu, Maria Ignacia (1945)
Alkorta, Jose Maria (1990)
Alkorta Irastorza sendia

Mendebaldeko ½
Otegi, Andres (1858)
Otegi, Maria Telesfora, Juana Bautista, Josefa Antonia, Maria Cruz, Daniel eta Sito (1876)
Urdanpilleta, Valentin (1909)
Urdanpilleta, Juan Bautista (1914)
Oiarbide, Jose Maria (1955)
Agirrezabala, Jesus & Erkizia, Angeles
Agirrezabala Erkizia sendia

# 89. Odolkierraga

## Etimologia

Izena *ordoki* (lautada) eta *erre* (erreta) hitzetatik eratorri dela dirudi, *-aga* atzizki lokatiboa erantsita. Baserri honen izenak hainbat aldagai izan ditu urteetan zehar: *Odoquiederraga* (1656); *Odolquierre* (1669); eta *Odolquiederraga* (1777).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Mendi-mazelaren erdialdeko lautada
zabal batean; bertan, ikuspen handia dago.




Koordenatuak:
UTM: X: 574392; Y: 4784833; Z: 201
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 3.1″, Lat.: 43º 12′ 42.6″; Alt.: 201

## Deskribapena

Baserri barrokoa da, harri-hormako baserriaren tipologiakoa, egurrezko egiturarekin; XVII. mendean eraikitako ataripea du. Oin angeluzuzeneko eraikin honek kareztatutako harri-hormak ditu; horrez gain, harlandua ere ikus daiteke, baina hego-mendebaldeko eskantzuan gorde da soilik. Behin eta berriz egin diren handitze-lanak direla-eta, baserriaren oina desitxuratu egin da, eta jatorrizko eraikinaren ezaugarriak ezabatu dira. Baoek ez dute inolako garrantzirik, eta modu nahiko desordenatuan daude irekita. Behesolairura sartzeko jatorrizko baoa nabarmentzen da soilik, iparraldera ematen duen fatxadan dagoena; apur bat beheratuta dagoen erdi-puntuko arku dobelatu batek osatzen du, eta, egun, apur bat itsututa dago.



Patxi Otaegi

**Baserriaren kokalekua (1987).**



Joxin Azkue

**Baserriaren fatxada nagusia, hainbat eta hainbat eranskinekin (2005).**



**Sarrerako jatorrizko baoaren xehetasuna, partzialki itsutua (2008)**

Eraikinaren barne-egitura partzialki gorde da, estalitako behesolairuan soilik; izan ere, orain dela urte batzuk apur bat ordeztu egin zuten, ustez azalera handitu asmoz. Obra egitean, hasierako piezen zati handi bat baliatu zuten, eta hondatuta zeudenak aldatu egin zituzten. Egitura hori zutikoen bidez dago osatuta, eta, horiek elkarren artean lotzeko, goihabeak erabiltzen dira; azken horiek, era berean, miru-buztaneko mihiztaduren bidez daude lotuta. Jatorrizko hormapikoa itsututa dago kanpoaldera, etxeari atxikitako eranskin baten ondorioz; bertan, hain zuzen, kijera erdi-mihiztadurak erabili dira, oin ñimiñoa gailurreko habearekin lotzeko.

## Historia

Odolkierraga baserriari buruzko datuen arabera, XVII. mendearen erdi aldera eraiki zuten. XVIII. mendearen hasierako dokumentu batean, Antonio Lopez Azkaratek eta Mariana Antziondok 1648an eta 1649an ezarritako zergen zerrenda bat dago, eta, bertan, honako hau jartzen du bermetzat: *"el sitio a donde esta fabricada la cassa de Odoquierraga"*. Geroztik, hainbat aldaketa egin dira jatorrizko eraikinean, guztiak ere garrantzi gutxikoak; baina, azkenean, ia erabat ezabatu da baserriaren jatorrizko irudia.

1711n, Juan Larrondobuno eta Catalina Ihartza jabeek zituzten jabetzen maiorazko bat sortzea erabaki zuten, horien iraupena bermatzeko eta beren herentzia babesteko, etorkizunean oinordekoen artean gerta zitezkeen zatiketen aurrean. Maiorazko hori Larrondobuno eta Altziturri oinetxeek eta Odolkierragak osatu zuten. Herentzia "blindatu" arren familiak zailtasun ekonomiko handiak pasa zituen, eta, XIX. mendearen erdialdera, oinordekoek herentziaren zati handi bat saldu behar izan zuten (Egieta, Olatza, Arrieta, Altziturri eta Odolkierraga etxeak), Larrondobuno baserria zerga-kargetatik babestea xede bakartzat hartuta (1847).


Zizurkilgo Udala

**Pepita Garinen ezkontza; argazkian Pepita, Joxepa Artola amarekin eta Anttoni Garin ahizparekin (1957).**


Zizurkilgo Udala

**Jexux Garin, behiak jezten (1973).**


Zizurkilgo Udala

**Mariano Garin, baratzean lanean (1966).**


Zizurkilgo Udala

**Jose Garin, ezkontza-egunean (1952).**



**Estalkiaren egitura; zutikoek gailurreko habeari eta goihabeari eusten diote, eta, gero, alboko hormetara irekiz doa (2008).**

## Baserriaren jabeak:

Larrondobuno, Ignacio & Zatarain, Maria (1656)
Larrondobuno, Juan & Ihartza, Catalina (1687)
Larrondobuno, Martin & Etxenagusia, Isabel (1710 b.l.)
Larrondobuno, Juan Martin & Gandarias, Maria Ignacia (1717)
Larrondobuno, Martin Manuel & Furundarena, Maria Josefa (1775)
Larrondobuno, Jose Antonio (1830)
Larrondobuno, Manuel Bernardo & Rekondo, Francisca Antonia (1847 b.l.)
Larrondobuno, Jose Antonio & Arbildi, Ramona (1847)
Muñagorri, Jose Miguel (1854)
Muñagorri, Jose Francisco & Larrunbide, Juana Francisca (1857)
Muñoa, Marcos Antonio & Pagadizabal, Manuela (1862)
Aranburu, Jose Maria (1878)
Aranburu, Cipriano (1898)
Aranburu, Jose Fermin (1915)
Garin, Mariano & Artola, Josefa (1949)
Garin, Jose (1978)
Garin Ibarbia sendia

## Etimologia

*Oihan/oiar* (oihana) hitzetik eratorritako izena da, *-tzun* ugaritasunaren atzizkiarekin. Baserria *Arizguruceta* (1853) edo *Oyarzunenea* (1879) izenen bidez ere aipatu izan da.

Joxin Azkue

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Arizkurutzeta muinoaren magaleko laugune batean, mendi-mazelaren erdialdean.




Koordenatuak:
UTM: X: 575491; Y: 4786665; Z: 334
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 13.5″; Lat.: 43º 13′ 41.6″; Alt.: 334




Hondatutako baserriaren kokalekua (2006).

## Historia

Oiartzun baserriaren historia oso laburra da, apenas izan baitzuen mende beteko bizitza. XIX. mendearen erdialdean eraiki zuten, aurrez Udalari erositako sail baten gainean; hala adierazi zuten 1853an eraikitzaileek: Juan Angel Makuso eta Maria Bautista Arruti (*"construieron a sus espensas de nueva planta una casuca que se conoce con el nombre de Arizguruzeta"*). Garai hartan, eraikinak behe-solairua, solairu nagusia eta ganbara zituen (1879).

Urte batzuen ondoren, 1901ean, eraikina honela definitu zuten: *"solar de casa quemada"*; dirudienez, etxea guztiz hondatuta zegoen. Geroztik, ez dago eraikina berriro berreraiki zutela adierazten duen aztarnarik; poliki-poliki, egoera okertuz joan da, egungo aurri-egoerara iritsi arte (1954an artean zutik zegoen).




Baserriaren kokalekua erakusten duen airetik hartutako argazkia (1954).

## Deskribapena

Baserria egun aurri-egoeran dago. Eraikina zegoen lekuan, harri-hormaren zati batzuk baino ez daude agerian, landarediz estalita; beraz, ezin dira ondo definitu eraikinaren ezaugarriak.




Baserriaren arrastoak (2006).

## Baserriaren jabeak:

Makuso, Juan Angel & Arruti, Maria Bautista (1853 b.l.)
Makuso, Jose Maria & Mutio, Maria Ignacia (1853)
Makuso, Juan Ignacio & Arruabarrena, Francisca (1883)
Makuso, Jose Maria & Mutio, Maria Ignacia (1897)
Aranburu, Cipriano (1901)
Aranburu, Jose Felix & Lertxundi, Sabina (1949)
Aranburu, Ignacio (1971)
Aranburu, Ignacio & Barriola, Juana Juliana (1971)
Aranburu, Fermin eta Sabina (1999)

## Etimologia

*Ola* (lan egiteko lekua edo etxolak) hitzetik eratorritako izena da, *-tza* atzizki lokatiboa gehituta. Agirietan beste izen batzuk ere agertzen dira baserri hau izendatzeko, *Olazagoyena* eta *Olazamutio*, esaterako; horiei, hain zuzen, XVIII. mendearen ia amaiera arte eutsi zitzaien.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Zelaigune zabalean ikus daiteke, antzinako herri-bidetik hurbil, eta multzo bat osatzen du beste eraikin batzuekin batera.




Koordenatuak:
UTM: X: 575838; Y: 4783576; Z: 118
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 59.6′′; Lat.: 43º 12′ 1.3′′; Alt.: 118

## Deskribapena

Baserria XX. mendean eraberritu zuten; baina, hala ere, jatorrizko eraikinaren ezaugarriak gordetzen ditu (XVII. mende amaierakoa edo XVIII. mende hasierakoa, agian). Baserriak oin angeluzuzena eta horma mistoak ditu; hau da, batzuk harri-hormak dira, eta beste batzuk kareztatutako hormigoiz eginak. Eraikinean, harlanduzko zenbait eskantzu ikus daitezke, baina guztiak desagertu egiten dira estalkira iritsi aurretik; hori, hain zuzen, azken urteetan izan diren eraberritze-lanen ondorio da, eta, ziur asko, baita egungo estaldura goratzearen ondorio ere. Baoek trazadura xumea dute, berezitasunik gabea, sarrerako baoak salbu, harlanduzko atezangoak baititu; dirudienez, aurreko eraikinetik gorde den arrasto gutxietako bat da.

Metro gutxira, eraikinaren hegoaldean, mandioa dago, kareztatutako harri-hormekin eta harlanduzko eskantzuekin. Horrez gain, hainbat zutiko eta goihabe ditu estalkian (hormigoiz partzialki estalita), txabetazko mihiztadurekin eta alderik aldeko egurrezko ziriarekin.

Eraikinaren barne-egitura guztiz eraberrituta dago, eta, jada, ez du jatorrizkoaren aztarnarik.



Patxi Otegi

**Baserria, haran sakonetik begiratuta (1987).**

**Baserria, eskuinean mandioa duela (2010).**

## Historia

Olatza baserriari buruzko lehenengo datu historikoa XVII. mendearen hasieran eman zen (1618); zehazki, Zizurkilgo Udalak hiribildu-titulua lor zezan ordaindu beharreko kostuari aurre egiten lagundu zuten baserrien zerrendan agertzen da: *"la casa de Olaza"*. Nolanahi ere, zenbait agiritan Martin de Olaça abizena zuen auzotar baten berri jaso zen aurrez, 1549an; beraz, orduurako, jada, baserria eraikita zegoela adieraz dezake.

Egiaz, egungo eraikinak horma mehelin batez soilik bereizitako bi etxe ditu oinarri, 1691ko espediente batean agertzen den bezala; hain zuzen, baserri horri buruzko aipamena egitean, Olazagoyena eta Olazamutio oinetxeak aipatzen ditu: *"que ambas estan juntas y debajo de un tejado"*. Hurrengo mendearen ia amaiera arte, bereizketa horri eutsi zitzaion, eta, azkenean, bi unitateek bat egin eta eraikin bakarra eratu zuten.


Zizurkilgo Udala

Olatzako familia, mandioaren ondoan (1937).

Hain zuzen, une berezi hartan (1691) eratu zuten izen bereko maiorazkoa, Mariana Iraragorriren eta Juan Etxenagusiaren arteko ezkontza zela-eta. Aldi berean, emaztegaiaren gurasoek beste hainbat jabetza eman zituzten (Olatza eta Arrieta baserriak), maiorazko hura ezartzeko betebeharrarekin; hala, beren familia-ondarearen osotasuna bermatu nahi zuten.

1724an egindako errenta-kontratuan, Fermin Iraola haren maizterrak urteko errenta gisa honako hau ordaintzeko konpromisoa hartu zuen: 20 dukat, 2 kapoi, 8 anega gari eta karga bat sagar.


Zizurkilgo Udala

Pedro eta Juanito Arrastoa anaiak, Maria Axun lehenengoaren alabarekin (1959).


Zizurkilgo Udala

Pedro Arrastoa eta Eskolastika Zabala, Tere eta Maria Axun alabekin (1962).


Zizurkilgo Udala

Olatzako familia (1934).


Zizurkilgo Udala

Olatzako familia-argazkia, baserriaren aurrean (1944).




Baserriaren fatxada nagusia (2010).

## Baserriaren jabeak:

Agirre, Juan Perez (1650)
Añorga, Ascensio & Altziturri, Magdalena (1665)
Etxeberria Irarragorri, Joanes & Agirre, Isabel (1670)
Irarragorri, Mariana & Etxenagusia, Juan (1691)
Etxenagusia, Isabel & Martin Larrondobuno (1711 b.l.)
Larrondobuno, Juan & Ihartza, Catalina (1687)
Larrondobuno, Juan Martin & Gandarias, Maria Ignacia (1717)
Larrondobuno, Martin Manuel & Furundarena, Maria Josefa (1775)
Larrondobuno, Jose Antonio (1830)
Larrondobuno, Manuel Bernardo & Rekondo, Francisca Antonia (1847 b.l.)
Larrondobuno, Jose Antonio & Arbildi, Ramona (1847)
Marmol, Jose Rafael & Goikoetxea, Jesusa (1854)
Marmol, Pedro & Serrano, Rufina (1886)
Marmol, Paulino & Tapia, Juana Josefa (1910)
Arrastoa, Miguel Antonio & Aranburu, Maria Dolores (1921)
Arrastoa, Jose Luis & Malkorra, Martina (1928)
Arrastoa, Pedro Juan & Zabala, Escolastica (1943)
Arrastoa Zabala sendia

# 92. Olentzaroetxeberri

## Etimologia

Ez dakigu ziur zer jatorri duen Olentzaroetxeberri izenak. Dokumentuetan *Mendiguren* izenaz aipatzen da lehenik (1830), eraikilearen abizenari jarraiki; eta ondoren, *Olenzaro-echeverria* (1860) edo *Onenzaro Echeverri* (1887) izenez, beharbada, jabeak erro bereko izendun baserriko maizterrak zirelako.

## Kokapena

Mendibailaran kokatua dago.
Hegalaren erdiko aldeko
zelaigune txiki batean.




Koordenadak:
UTM: X: 573715; Y: 4786429; Z: 340
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 32.3′′; Lat.: 43º 13′ 34.5′′, Alt.: 340



**Baserriaren kokalekua (2009).**

## Deskribapena

Baserri neoklasikoa da, XIX. mendearen hasiera aldera eraikitakoen tipologiakoa. Harri-hormak eta zurezko egitura ditu. Oinplano laukizuzena du. Harri-hormen kareztadura oso egoera kaxkarrean dago, eta ertzetan harlanduska du. Baoek antzeko traza eta zurezko markoa dituzte, eta banaketa oso uniformea.

Eraikinaren barruko egitura oso-osorik gorde da, utzita egonik oso egoera kaxkarrean dagoen arren. Egiturak sekzio handiko zurezko zutabeak ditu. Beheko solairuan, zutabeok pilareharrien gainean kokatuta daude; eta goikoetan, zur-erdika lotzen dira habeekin.

Habe horien gainean kokatzen dira, ahokatutako neurri handiko txarrantxen laguntzaz, gailurrari eusten dioten zutabetxoak.

## Baserriaren jabeak:

Mendiguren, Miguel & Irazu, Josefa Antonia (1830 b.l.)
Mendiguren, Domingo Ignacio & Muñagorri, Bautista Antonia (1830)
Mendiguren, Juan Francisco & Etxeberria, Micaela Antonia (1860)
Mendiguren, Josefa Joaquina & Labaka, Jose Antonio (1904)
Labaka, Juan Jose & Lasa, Paula (1919)
Labaka, Sara & Otaño, Martin (1935)
Otaño Labaka sendia

## Historia

Olentzaroetxeberri baserria XIX. mendearen hasieran eraiki zuten Miguel Mendigurenek eta Josefa Antonia Irazuk gerra napoleonikoetan eman zituzten maileguen ordainetan Kontzejuak berriki emandako onibar batean (*"en el que construieron …una casa llamada Mendiguren"* -1830-).

Eraikinak beheko solairua, solairu nagusia eta goiko aldean tauladun bigarren solairu bat (ganbara) zituen 1887an. Eraikin hori aldaketa nabarmenik gabe iritsi zaigun gaur egunera arte.



**Aurreko planoan eta erdian, Jose Mari Otaño (1958) .**

Zizurkilgo Udala

**Beheko solairuko egitura, zutabeak pilareharrien gainean (2009).**



Baserriaren atzealdeko fatxada.



Patxi Otegi

Baserriaren ikuspegi orokorra (1987).

Zutabeen, habe horizontalen eta zutabetxoen egitura, estalkiari eusteko (2009).

# 93. Olentzarozar

## Etimologia

Ez dakigu ziur zer jatorri duen Olentzarozar izenak. Dokumentuetan *Onenzaro* izenaz aipatzen da lehenik; eta ondoren, *zar* (zahar) adjektiboa eransten zaio, Zarate aldean dagoen erro bereko izendun baserritik bereizteko.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Mendi-hegalaren beheko aldean, eta Villabonatik Asteasurako bide zaharretik hurbil.




Koordenadak:
UTM: X: 575209; Y: 4782757; Z: 69
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 27.9″; Lat.: 43º 11′ 35″; Alt.: 69

## Deskribapena

Armazoidun baserria da, XVIII. mendean eraikitakoen tipologiakoa, berriki aldaketa nabarmenak jasan dituen arren. Oinplano laukizuzena du, bistako harri-hormak eta, izkinetan, harlanduak. Beheko solairuko baoak soilik dira harlanduz eginak, gainerakoek berriki konpondutako zurezko marko soilak dituzte. Baoen banaketa nahiko erregularra da, ostalaritzarako egokitzean bao berriren bat ireki den arren. Jatorrizko eraikinaren sarrera ekialdeko fatxadan zegoen. Fatxada horrek soilik gordetzen ditu eraikinaren jatorrizko ezaugarriak, gainerakoak partzialki eraberritu baitira. Fatxada horrek zurezko armazoia du teilatupeko oinean, baodun hormatal bertikaletan antolatuta.

Jatorrizko eraikinari zenbait bolumen erantsi zaizkio ipar-mendebaldeko eta batez ere hegoaldeko fatxadetan. Argazkietan ikus daitekeenez, erabat hondatuta zegoen.

Eraikinaren barruko egitura erabat berritua dago, pieza berriez ordezkatu baita, eta beraz, ez dago jatorrizkoaren arrastorik.

## Historia

Olentzarozar baserriari buruzko lehen aipamen idatziak XVI. mendearen erdikoak dira (1544). Bertan, ondoko Luzuriaga baserriarekin zuen lotura aipatzen zen. Horrela, baserri haren jabeek eraiki zutela hau pentsa daiteke, zehaztu gabeko garai batean, etxaldearen aprobetxamendua areagotzeko.

Eraikina hainbat aldiz eraberritua izan da. Lan nabarmenenak Gabriel Larrondobunok egindakoak dira, 1740-1742 urteen inguruan eraikina ia erabat eraberritu baitzuen, gaur egun duen itxura emateko. Garai bateko baserria ostalaritzarako egokitzean, antzinako eitea berreskuratzeko aukera izan da, partzialki bada ere, haren irudia berritzeko.



Julian Arrastoa

**Baserriaren atzeko fatxada, erortzen ari zela. Atzean, Olentzaroberri (1993).**



Julian Arrastoa

**Baserriaren fatxada nagusia, zaharberritu aurretik (1993).**

### Baserriaren jabeak:

Luzuriaga, Joanes (1544)
Luzuriaga, Juan Miguel & Iriondo, Maria Ascension (1691)
Luzuriaga, Maria Miguel & Larrondobuno, Juan (1709)
Larrondobuno, Gabriel Felix & Saizar, Maria (1736)
Luzuriaga, Maria Miguel & Larrondobuno, Juan (1752)
Etxeberria Otazu, Mª Ascension & Aialde, Pedro Ignacio & Etxenagusia, Cayetana (1756)
Aialde, Miguel Antonio & Martin (1762)
Altzibar, Miguel Maria (1835)
Altzibar, Manuel Maria (1862 b.l.)
Altzibar, Maria Angeles & Zurbano, Esteban (1862)
Zurbano, Maria Dolores & Luis (1933)
Labaka, Pedro Ignacio (1940)
Labaka, Maria Antonia & Maria Isabel (1968)
Olentzaro Zahar, S.L.

GAO, JDT 383-3

**Zizurkilerako sarbide-errepide berriaren planoaren xehetasuna (1921).**



Zizurkilgo Udala

**Alboko fatxada eta erantsitako bolumenak, zaharberritu ondoren (2000).**

## Etimologia

Izena *ota* (ote) hitzetik eta *–zu* (-tsu) ugaritasun-atzizkitik dator. *Echeberria-Otazu* izenez ere aipatu izan da, ziurrenik XX. mendera arte baserriaren jabe izandako familia horrek eraikia izango zelako.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatua dago. Hegalaren erdiko zelaigune zabal batean.




Koordenadak:
UTM: X: 574431; Y: 4784142; Z: 146
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 1.7′′, Lat.: 43º 12′ 20.2′′; Alt.: 146

## Deskribapena

Berriki erabat eraberritutako baserria. Oinplano karratua du. Ez da gorde jatorrizko eraikineko elementurik, eta material modernoak erabili dira kanpoko nahiz barruko egituretan.
Gailurrean egungo jabearen aitonak, lanbidez hargina izanik, jarritako harrizko gurutze bat ikus daiteke.

## Historia

Otazu baserriaren lehen aipamen historikoa XVII. mendearen hasierakoa da (1618), Zizurkilgo kontzejuak hiribildu titulua lortzeko diruz lagundu zuten baserrien zerrendan baitago: *"casa de Otazu"*. Aitzitik, 1391 urtean, Matxin d'Otaçu izeneko herritar bat aipatzen da, Zizurkil Tolosako hiribilduan auzotu zeneko aktan, eta beraz, balitekeke baserri hori orduko existitu izana.
Otazu baserria Zizurkilgo jatorrizko 21 oinetxeetako bat da, eta armarria edukitzeko eskubidea du. Hori horrela izanik, Francisco Etxeberriak eta Maria Josefa Mintegiak maiorazkoa ezartzea erabaki zuten 1776an, arrazoi hauek emanez: *"por quanto la experiencia enseña que de las haciendas y caudales que han adquirido los hombres mas poderosos solo permaneze y ai memoria de la parte que de ellos se ha vinculado y con estar siempre en un posedor vibe este con maior lustre quedando perpetuado aquella en las casas y linage"*.
1865ean baserriak bi solairu eta ganbara zituen gutxienez. Beheko solairuan, ukuilua, sukaldea eta upategia zituen; eta solairu nagusian, logelak. Gaur egun ez dago eraikin haren arrastorik, duela hamarkada gutxi berreraiki baitzen.


**Fatxada nagusia (2008).**

Bartolome Auzmendi


**Baserriaren atzeko fatxada (1974) .**

### Baserriaren jabeak:

Etxeberria Otazu, Juan Perez & Larrondobuno, Mariana (1695)
Etxeberria Otazu, Ignacio & Etxenagusia, Maria (1700)
Etxeberria Otazu, Juan Francisco & Mintegiaga, Maria Josefa (1746)
Etxeberria Otazu, Baltasar & Mendizabal, Maria Josefa (1776)
Etxeberria Otazu, Juan Ascensio & Olaziregi, Josefa Ignacia (1790)
Etxeberria Otazu, Juan Antonio (1828)
Etxeberria Otazu, Sebastian & Zabala, Ana Josefa (1837)
Etxeberria Otazu, Jose Domingo & Irarreta, Maria Pilar (1862)
Etxeberria Otazu, Silveria Pia & Otaño, Juan Ignacio (1919)
Otaño, Jose Domingo & Ugartemendia, Maria Carmen (1942)
Otaño, Antonio

Zizurkilgo Udala


**Inazio Otañoren eta Pia Etxeberriaren sendia: Martin, Lurazi, Joxe, Maria, Joxe eta Manuel seme-alabak (1926).**

## Etimologia

Izena *pago* eta *mendi* errotik dator. Agiriek *Paga menor* (1470) edo *Fagandi* (1625) izenez ere aipatzen dute.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Mendi-mazelaren erdian dagoen laugune zabal batean, Aizbakarra muinoan bertan.

Koordenatuak:
UTM: X: 574871; Y: 4786615; Z: 328
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 41″; Lat.: 43º 13′ 40.2″; Alt.: 328





Berreraikitako baserriari erantsitako egituraren xehetasuna (2008).

## Deskribapena

Zati batean hondatuta dago. Etxe handia da, bi eraikinetan banatutakoa. Kontserbazio-egoera, berriz, hobea da batean bestean baino.
Mendebaldeko erdiak zutik dirau, etxebizitza-erabilera eman zaio, eta 1970-1980ko hamarkadan berritu zuten. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da. Harri-hormak ditu karez zurituak eta harlanduzko eskantsuak karez estaliak. Baserriaren erdi hori jatorrizko baserriaren perimetroa izandakoaren gainean berreraikita dago. Mendebaldeko hegalean izan ezik, estalkiaren noranzkoa aldatu egin dute. Baoak arruntak dira, baina batzuek orain gutxi egindako zurezko buruak dituzte. Antolaketa nahiko erregularra da. Atzealdean, arku-formako zubi batetik barrena, mandiorako sarbidea dago.

Ekialdeko erdia hondamen bidean dago, baina zutik dirau ekialdeen duen muturra. Haren fabrika bestearen berdin-berdina da.
Zutik dirauen eraikin-zati bakarraren barrualdea zeharo aldatuta eta guztiz berrituta dago, eta, beraz, ez dago jatorrizko eraikinaren aztarnarik.

## Historia

Pagamendi baserriaren historia XV. mendearen bukaeran abiatzen da: San Millaneko jaunak bere ondasunen zerrenda aurkeztu eta bertan *Paga menor* baserria ere aipatzen da. Urte batzuk geroago, Kontzejuak San Millaneko jauna salatu zuen bere saroietan herrilarreen kalterako hainbat baserri eraikitzeagatik, eta orduan baserriaren jabetza zalantzan jarriko zuten. Horien artean omen zeuden Pagamendi, Eskeltzu edo Arizkurutzeta baserriak (1539). Auziaren amaieran eraikin batzuk baimendu eta beste batzuk eraitsi egin zituzten. Kontzejuaren eta San Millan sendiaren arteko liskarrak, baita Kontzejuaren eta baserrietako maizterren artekoak ere, mendeetan luzatu ziren hainbat arrazoirengatik (artzain zebiltzanen gehiegikeriak, zuhaitz-mozketak, herri-lurren lapurreta). Askotan, maizterrek kartzelan bukatzen zuten, baina gatazkak konpondu egiten ziren azkenean. Maizterrek ordaindu beharreko errenta aldatuz joan zen. XIX. mendearen hasieran (1803) 574 erreal, ahari 1 eta 2 kapoi ordaindu behar ziren, 1835. urtean, aldiz, 18 anega gari, 220 erreal eta 2 kapoi.



Baserriaren alboko fatxada (2008).




Martin eta Martin Jose Balda anaiak, baserriaren parean (1962).




Balda ahizpak Ernioko erromerian: Julia, Teresa eta Josefa Balda (1955).




Martin Balda bere seme-alabekin baserriko atarian: Asensio, Josepe, Millan, Joxemari, Joxe Ramon, Bixente eta Maria Teresa (1962).




Baserriko fatxada nagusia (1974).

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Martin Ruiz & Berrasoeta, Juana & San Millan, Juana Ruiz (1470)
San Millan, Martin Ruiz & Gabiria, Margarita (1505)
San Millan, Martin Ruiz & Lasarte, Isabel (1554)
San Millan, Juan Ruiz & Ugarriaras, Maria Lopez (1548)
San Millan, Millan Ruiz & Okendo, Maria (1590)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Okendo, Miguel Carlos & Etxeberri, Antonia Maria (1681)
Okendo, Micaela & Agirre, Jose (1693)
Agirre, Jose Antonio & Jauregi, Ana & Sarria, Fausta & Altzaga, Maria Ines (1701)
Agirre, Jose Francisco & Porcel, Maria Teresa (1720)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1744)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baroi (1877)
Balda, Martin & Tejeria, Basilisa (1939)
Balda Tejeria sendia

## Etimologia

*Pago* eta *muño/buño* (muino) hitzetatik eratorritako izena. Agiriek *Fagobuno* (1475), *Fagabuno* (1539) edo *Pagabuno* (1618) izenez ere aipatzen dute.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago. Mendi-mazelaren erdian dagoen laugune batean. Egun ingurua oso aldatuta dago, zenbait urbanizazio daude eta bertan.



Koordenatuak:
UTM: X: 576722; Y: 4782786; Z: 65
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 20.8″; Lat.: 43º 11′ 35.4″; Alt.: 65



Julian Arrastoa

**Baserriaren fatxada nagusia, dena eraitsi baino lehen (1995).**

## Deskribapena

Orain dela gutxi berritu eta etxebizitza-bloke bihurtutako eraikin modernoa da. Ez da zaharraren aztarnarik aurkitzen, baina egikera berriko armarri bat dauka fatxadan, eta hau irakurtzen da: "Aramburu" (azken jabea hura izan baitzen). Eta aldameneko lorategian dolare bateko azpila dago, "Pagamuño" izena daramana, baserri zaharraren oroitzapenetan.

Jatorrizko baserria oinplano angeluzuzeneko eraikina zen. Harri-hormak zituen karez zurituak eta harlanduzko lanak eskantzuetan. Baoak oso arruntak dira eta modu erregularrean antolatuta daude (1995).

## Historia

Pagamuño baserria XVI. mendearen hasieran (1539) aipatzen da lehen aldiz. Dena den, lehenago ere Petri de Pagabuno izeneko auzotar baten aipamena egiten da, Zizurkilgo herria Tolosan auzoko egiteko agiriaren haritik (1391), eta litekeena da baserria eraikia egotea garai hartan. Baserria Zizurkilen dauden 21 oinetxeetako bat da, beraz, armarria izateko eskubidea du.




GAO. JDIM. 2-7-105

**Villabonatik Asteasu eta Zizurkilerako bide berriaren trazatuaren planoa (1781. urtekoa).**

Lehengo etxe zaharrak, sagardoa gordetzeko 2 kupel zituen gutxienez eta *"una casilla pequeña que esta pegante"*. Eraikina suntsitu egin omen zuten Independentzia Gerran, hala aipatzen baita urte batzuk geroago bere jabeek Pagamuño baserria errautsetatik eraikitzeko jarri zuten dirua eskatzen dutenean (1818). Huraxe izango da ia gure garaietaraino iritsiko dena eta duela gutxi etxebizitza-bloke moderno batek ordeztu duena.



**Fatxadaren xehetasuna, dolareko azpila aurre-aurrean (2008).**

### Baserriaren jabeak:

Lizarraga, Catalina (1597)
Agirre, Catalina Perez & Mendibil, Fernando Perez (1607)
Aiestaran, Juan & Ibarra, Luisa (1659)
Aiestaran, Ines Maria & Otxoa, Sebastian (1711)
Lardizabal, Manuel (1835)
Lardizabal, Manuela & Mendizabal, Francisco Sales (1850 b.l.)
Jugo, Dolores & La Torre, Manuel (1850)
Castillo de la Torre, Joaquin eta Pilar (1900)
"Portu Hermanos Cia.". Paperota (1926)
Aranburu, Jose Fermin & Lertxundi, Sabina (1931)
Aranburu, Ignacio & Barriola, Juana Juliana (1962)
Aranburu, Andres
Jabekideak

# 97. Plazaetxeberri

## Etimologia

Izenaren jatorria estu lotuta dago hirigunean hartzen duen kokapenarekin: *plaza, etxe* eta *berria*.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta dago.




Koordenatuak:
UTM: X: 575359; Y: 4783557; Z: 112
Geografikoak: Long.: -2° 4′ 20.8″; Lat.: 43° 12′ 0.9″; Alt.: 112

## Deskribapena

Armazoiarekin eraiki ohi ziren baserrien tipologia du, XVII. mendekoa. Gaur egun, ostalaritzarako etxea da, eta asmo horrekin berritu dute baserriaren parte bat. Oinplano karratuko eraikina da. Agerian ditu harri-hormak eta harlanduzko lanak eskantzuetan, estalkipean ez bezala, hor zurezko egitura eta harri-hormak baitaude, ikusteko moduan jarriak orain dela gutxi (Ekialdeko eta Mendebaldeko fatxadak). Baoek harlanduzko azpadurak dituzte beheko solairuan eta solairu nagusian, baina estalkipekoak arruntak dira eta egituraren oihal-hormen artetik zabaltzen dira. Estalkiaren hegalak fintasunez hornitutako jabaloiak ditu.

Iparraldeko hormaren kontra, jatetxearen lagungarri gisa, estalitako terraza bat erantsi da. Apaingarri bat dago bertan, ustez Amabi baserritik ekarria.

Barrualdeko egitura egoera nahiko onean dago egindako eraldaketak ugariak izan badira ere. Barrualde hori pieza bakarreko zutabeek osatzen dute. Zutabe horiek egurrezko habe lodiei eusten diete beheko solairuetan, baita teilatuari eusten dioten uhalen elkarguneari ere. Zutabe horien guztien heldura aho-zirikako mihiztadura bidez lotutako jabaloien bidez egiten da. Zutabeak gailur zentralen bitartez lotzen dira, baita alboko gailurren bitartez ere, perimetro-paretari lotzeko. Zenbait arotz-marka ikus daitezke zurezko piezetan.

GAO. OA 6757



Fatxada nagusia, XX. mendearen hasieran (1914).

## Historia

Agiriak gutxi dira, eta gure artean ditugunak ere ez dira XVIII. mendearen (1786) bukaera baino lehenagokoak. Hala ere, Plazaetxeberri baserriaren egiturak berak esaten digu eraikia behar zuela mende bete lehenago.

Uste da eraikina oso goiz hasi zela ostalaritza-zerbitzuak ematen, eta 1827an ardoa eta pattarra saltzeko Kontzejuaren baimena zuten saltegien artean agertzen da, Zubimusu eta Udaletxe-arkupeko tabernekin eta Zarateko Bentarekin batera.



Fatxada nagusia, dena berritu baino lehen (1987).

Joxin Azkue



Fatxada nagusia, dena berritu ondoren (2010).

Estalkiaren hanka, egurrezko habe lodien bidez lotutako pieza bakarreko zutabeekin (2008).



Arotzarenak diren markak estalkiaren armazoian (2008).



Joxin Azkue

Landutako piezak dituen hegalaren xehetasuna (2004).




**Baserriaren atzealdeko fatxada (1940ko hamarkada).**

## Etimologia

Ez dakigu ongi Portxeta izenaren jatorria zein den. Agiriek *Porseta* (1608) edo *Porcheta* (1618) izenez ere aipatzen dute.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Inguruetako bista zabala duen mendi-mazelaren erdian sortzen den laugune batean.




Koordenatuak:
UTM: X: 575225; Y: 4783719, Z: 137
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 26.7″; Lat.: 43º 12′ 6.2″, Alt.: 137




Baserria, airetik ikusita (1984).




Baserria baran sakanetik ikusita (1978).

## Deskribapena

XVII eta XVIII. mendeen artean harri-hormaz eta zurezko egituraz eraiki ohi ziren baserrien modukoa da. Etxe handia da eta oinplano karratukoa. Harri-hormak ditu karez zurituak eta harlanduzko lanak eskantzuetan. Fatxada nagusiko baoek ere harlanduzko azpadurak dituzte, oso homogeneoa den antolaketa osatuz. Ekialdeko eta Hegoaldeko fatxadek sarrera bana dute. Sarrerek dobela luzeko erdi-puntuko arkuak dituzte eta lehengo ezkaratza zaharrerako sarbide ziren. Harlanduzko marka batek fatxada nagusian zehazten du beheko solairuaren eta lehenengo solairuaren arteko bereizketa. Marka hori alboko fatxadetaraino hedatzen bada ere, haietako bakarrean baino ez da ikusten, bestearen kontra egitura bat erantsi delako.
Barrualdeko egitura berritu egin dute, eta ez da jatorrizko eraikinaren aztarnarik aurkitzen.

## Historia

Ditugun agiriak ez dira XVII. mendearen hasiera baino lehenagokoak (1608), baina litekeena da mende bete lehenago ere baserria eraikia egotea.
Baserriari buruzko aipamenek gorabehera handirik gabeko bilakaera adierazten dute. XVII. mendearen erdialdean, San Millan familiak erosi eta bere ondare ugariei gehitu zien, baina Lasarteko Brigiden Komentuak baserria bereganatuko zuen urte gutxi batzuk geroago, Teresa San Millanen ondasunen aurkako hartzekodunen lehiaketaren ondoren.
1697an, jabeak errentan emanda zuen, urtean 17 dukat eta 2 kapoiren truke.




Belar-meta bat, baserri parean (1978).



Portxetako "motza" Birautz sagardotegian egindako aizkora apustu batean (1935).



Balbina Arriola bere alaba Maritxu Beldarrainekin, haren ahizpa Juanitaren ezkontza-egunean (1962).



Jeronimo Iraolaren eta Juanita Beldarrainen arteko ezkontza, "uztarriaren azpian" (1962).



Balbina Barriola, etxeko atariaren ondoan (1956).

## Baserriaren jabeak:

Porseta, Domenja eta Elizondo, Esteban (1608)
Elizondo Joanes (1645 b.l.)
Okendo, María & San Millan, Miguel (1645)
Okendo, Miguel & San Millan, Teresa (1646)
Brigidatarren Komentua (Lasarte) (1681)
San Millan, Gabriel (1700)
San Millan, Juan Lopez & Etxeberria Otazu, Maria Luisa (1703)
San Millan, Miguel Antonio & Ezeiza, Maria Josefa (1735)
San Millan, Maria Josefa & Alzuru, Pedro & Larrunbide, Juan Bautista (1767)
Alzuru, Juan Francisco (1829)
Ilardia, Manuel Jose & Aranberri, Maria Cruz (1843)
Sarasola, Francisco Antonio (1879)
Arrizabalaga, Martin Maria & Aranburu, Maria Josefa (1879)
Arrizabalaga, Jose Vicente & Otaño, Ambrosia (1914)
Otegi, Juana Josefa (1929)
Beldarrain, Jose Vicente & Arizeta, Balbina (1934)
Beldarrain, Juana Francisca & Iraola, Jeronimo (1971)
Iraola Beldarrain sendia

# 99. Sagasti

## Etimologia

*Sagar* errotik eta *–ti* leku-atzizkitik eratorritako izena da. Agiriek beste adiera hau ere aipatzen dute: *Sarasti* (1457).

**Ustezko baserriaren kokalekua ikuspegi orokorra (2010).**

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta zegoen.

Egungo Fraisoro futbol-zelaiaren inguruan.





**Baserriaren gutxi gorabeherako kokalekua (2010).**

## Deskribapena

Desagertutako baserria da. Zehatz-mehatz ez dakigu non zegoen kokaturik, ezta eraikinaren ezaugarriak zeintzuk ziren ere.

1865ekoa da gure egunetaraino iritsi zaigun etxeari buruzko deskribapen bakarra. Bertan aipatzen da eraikinak sukaldea, sotoa, gela eta ukuilua dituela beheko solairuan, egongela, logelak eta mandioa lehenengo solairuan, eta, azkenik, ganbara.

## Historia

Sagasti baserria XVII. mendearen hasieran aipatzen da (1618), Zizurkilgo Kontzejua hiribildu izendatzeko kostuak ordaintzen lagundu zuten baserrien artean: *"la casa de Sarasti"*. Baina ez dakigu zein urtetan eraiki zuten. Hala ere, data hori baino lehenago ere Juan de Sarasti izeneko bizilagun baten berri ematen da, herri-mendiei buruzko hitzarmen baten haritik (1457).

Jatorrizko eraikina, ziurrenik, erabat eraberritu zuten XVIII. mendearen hasieran, Teresa San Millanen, abizen bereko orubearen jabe-andrearen aurkako hartzekodunen lehiaketan Antonio Lejaristik etxea bereganatu eta gero. 1715ean esaten da erosketa horren ondoren baserria berreraiki (*"después de dicha compra reedificaron"*) eta Fraisoro izeneko maiorazko sortu berrian sartu zutela. Une hartatik aurrera bi eraikin horien historiak estu-estu lotuko dira. Izan ere, instalazio berriak bertan jartzeko asmoz, Aldundiak Fraisoroko finka eskuratu eta, urtetara, alboko etxaldeak erosi egin zituen azkenean, instalazioak handitzeko (1922).

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Millan Ruiz & Okendo, Maria (1618)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Lasarteko Brigidatarren Komentua (1681)
Lejaristi, Antonio & Zuzulupe (1714)
Lejaristi, Agustin & Zaldua, Isabel (1715)
Lejaristi, Marcos Antonio & Barrenetxea, Micaela (1752)
Lejaristi, Jose Antonio & Zubimendi, Maria Micaela (1774)
Lejaristi, Juan Bautista & San Millan, Maria Isabel (1816 b.l.)
Lejaristi, Jose Ignacio & (1865)
Arsuaga, Domingo Ignacio (1867)
Arsuaga, Juan Jose (1883)
Aurrezki Kutxa (1904)
Gipuzkoako Foru Aldundia (1922)

## Etimologia

Izena *sagar* eta *–ti* leku-atzizkitik eta *zar* errotik dator. Gaur egungo izena izen zaharraren laburketa da: *Sagastizar* (1391).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Mendi-mazelaren erdian sortzen
den laugune batean, Adunatik gertu.



Koordenatuak:
UTM: X: 575879; Y: 4784048, Z: 121
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 57.5″; Lat.: 43º 12′ 16.6″; Alt.: 121


Patxi Otegi

Fatxada nagusia, dena eraberritu ondoren (1987).

## Deskribapena

Baserria erre egin zen (1971) eta erabat eraberrituta dago. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eraikuntza-material modernoekin egina dago eta ez dio etxe zaharraren egiturari eusten, ez kanpoaldean, ez barrualdean.

Lehengo etxe zaharraren argazki urriei erreparatuta, eraikin xumea ematen du, harri-hormak zituen karez zurituak, eta baoak zurezko leihoburudunak.

## Historia

Saizar baserriari buruzko lehenengo ohar historikoa XVII. mendean agertzen da(1618), Zizurkilgo Kontzejua hiribildu izendatzeko kostuak ordaintzen lagundu zuten baserrien artean aipatuta: *"la casa de Sagastizar"*. Baina ez dakigu zein urtetan eraiki zuten. Hala ere, data hori baino lehenago ere Miguel Periz de Sagastiçar izeneko bizilagun baten berri ematen da, Zizurkilgo herria Tolosan auzoko egiteko agiriaren haritik (1391), eta, beraz, litekeena da baserria eraikia egotea garai hartan.

Baserriaren parte bat XVII. mendearen amaieran berritu zuten, estalkia batez ere (1698). 1864an, aipatzen da baserriak sukaldea, gela, logelak, ukuiluak eta labea zituela beheko solairuan, 2 logela eta mandioa lehenengo solairuan, eta, azkenik, ganbara.


Zizurkilgo Udala

Suak erretako baserria (1971).

Baina eraikin hori ez da gure egunetaraino heldu den berbera, izan ere II. Karlistadak (1871-1875) iraun bitartean, inguruan izan ziren borroken ondorioz, baserria birrindua izan zen, eta 1879an *"caseria quemada"* bezala aipatzen dute. Paradoxikoki, etxea eraberritu eta ia mende bete geroago suak erraustu zuen berriro, 1971n.


Zizurkilgo Udala

Suak erretako baserria (1971).

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Pedro (1649)
Beldarrain, Joanes eta Domingo (1670)
Beldarrain, Pedro (1694)
Beldarrain, Juan Francisco & Etxeberria Otazu, Maria Ignacia (1758)
Beldarrain, Juan Francisco & Ezeiza, Ana Teresa (1775)
Beldarrain, Francisco Antonio & Sorazabal, Francisca Antonia (1790)
Beldarrain, Jose Maria (1832)
Beldarrain, Jose Francisco & Imaz, Josefa Antonia (1866)
Muñoa, Miguel (1882)
Amunarriz, Ignacio (1895)
Muñoa, Miguel (1908)
Arruabarrena, Atanasio, Juliana eta Maria Andrea; Iraola, Josefa Ignacia; Iturralde, Mari eta Catalina; Muñoa, Rosa Francisca eta Jose Maria (1915)
Errandonea, Manuel & Errandonea, Emilia (1926)
Garaikoetxea, Federico (1929)
Ihartza, Ramon & Mujika, Asuncion (1931)
Baserri ½
Tejeria, Antonio (1942)
Tejeria, Juan Jose, Jose Rufino eta Maria Tomasa (1949)
Baserri ½
Iraola, Albino (1942)
Eizagirre, Juan Jose & Zurutuza, Elisa (1954)
Eizagirre, Pedro Maria
Baserri osoa
Eizagirre Zurutuza sendia

# 101. Salugarate

## Etimologia

Ez dakigu ongi Salugarate izenaren jatorria zein den, baina hainbat egilek haitzarte esan nahi duela diote. Agiriek honako beste adiera hauek ere aipatzen dituzte: *Salubarate* (1816) edo *Zalubarate* (1824), baita *Satubate* (1920) laburketa ere.

## Kokapena

Akezko bailaran kokatuta dago. Inguruetako bista zabala duen laugune batean, Goikogaña muinoan bertan.




Koordenatuak:
UTM: X: 575365, Y: 4783156; Z: 125
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 20.8′′; Lat.: 43º 11′ 47.9′′, Alt.: 125

Fatxada nagusia (2009).

## Deskribapena

Baserri errenazentista da, XVII. mendean armazoiarekin eraiki ohi ziren baserrien modukoa. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da. Harri-hormetako kare zuria oso hondatuta dago fatxada nagusian, eta, atzealdean, berriz, agerian. Harlanduzko eskantzuak ditu lehengo etxe zaharraren mugak zehazten, eta beheko solairuan, zenbait baok azpadurak ditu. Fatxada nagusiak agerian du jatorrizko etxearena den zurezko habeartea, baoak biltzen dituena. Eraikinaren goiko partean fatxada horretako pinoiak zabalik jarraitzen du, atzealdekoak ez bezala.



Baserriaren kokalekua (1987).

Patxi Otegi

Eraikinaren jatorrizko egitura modu nabarmenean handitu zuten, etxearen albo bietako fatxadei egitura bana erantsiz, lanerako eta etxebizitzarako azalera handitzeko asmoarekin. Erantsitako eraikin horiek harri-hormaz eginak daude eta gero industria-adreiluz eraberritu zituzten. Ekialdekoak mandiorako sarbide den arrapala du.

Etxearen barrualdeko egitura nahiko egoera onean dago. Pieza bakarreko sei zutabek osatzen dute, eta bizkar-habearekiko paralelo daude binaka jarriak. Zutabe horiek kijera mihiztadura bidez lotzen dira habeetara, eta zutabeei eta habeei aho-zirikako mihiztadura bidez lotutako jabaloiek lagunduta daude.

Estalkiari eusten dion egitura, pieza bakarreko zutabeek habe-uhalak eusten dituztela (2009).



Habeak eusten dituzten txarrantxa lagundutako pilaren xehetasuna



Joxin Azkue

Fatxada nagusiko egituraren xehetasuna (2004).

## Historia

Salugarate baserria eraiki zuten XVII. mendearen bukaeran, oso hurbil duen Mutio oinetxearena den lurzoru batean. 1696an, etxearen eraikuntzari buruz argi eta garbi zehazten du bere testamentuan Juan Mutiok: *"fabricada por mi… toda ella nueba desde sus cimientos y en jurisdicción propia"*, eskritura idatzi eta zertxobait lehenago, nahiz eta eraikuntzaren joskerak gogora ekarri zaharragoen eredua. Horrela, jabeek etekin handiagoa ateratzen zioten etxaldeari, eta lortutako diru-sarrerak ere handiagoak izango ziren.

Mutio familiak (gero Gandarias familiak) bi baserrien jabetzari eutsi zion 1785. urtera arte. Urte hartan Salugarate baserria saldu egin behar izan zuten, zor handiak izaki etxea bahitzeko mehatxua zuten eta. Jabe berriak, Pedro Rekondo presbiteroak, baserria bereganatu eta urte berean sortuko du premutasuna, gerora izan zitezkeen oinordekoentzat osorik bermatzeko.



Zizurkilgo Udala

**Gabriel, Eleuteri, Juana Mari eta Mattin Mendizabal anai-arrebak (1967).**



Zizurkilgo Udala

**Joxe Mari Mendizabal eta Maria Alberdi, beren seme-alabekin batera Luis Mendizabalen ezkontzan (1960).**



Zizurkilgo Udala

**Jose Mari Mendizabal, behean dago eta eskuinaldean, lagunekin Ernioko erromerian. Denak ohizko zintaz eta dominez jantzita (1961).**



Zizurkilgo Udala

**Mattin eta Joxe Mari Mendizabal anaiak, pilota-partida irabazi ondoren (1960).**

## Baserriaren jabeak:

Mutio, Joanes & Larrondobuno, Maria Josefa (1691)
Mutio, Gabriel & Beldarrain, Magdalena (1696)
Mutio, Juan & Karrera, Maria Magdalena (1741)
Mutio, Maria Concepcion & Gandarias, Sebastian (1754)
Gandarias, Maria Josefa & Atorrasagasti, Juan Bautista (1779)
Gandarias, Maria Magdalena & Etxabeguren, Domingo Ignacio (1784)
Rekondo, Pedro Jose (1785)
Rekondo, Jose Javier & Eznarrizaga, Domenja (1785)
Rekondo, Pedro Luis & Ezeiza, Francisca (1824 b.l.)
Rekondo, Pedro Francisco & Pagola, Maria Ignacia (1824)
Rekondo, Pedro Manuel & Bengoetxea, Brigida (1840)
Rekondo, Francisco Maria & Zabala, Juana Josefa (1848)
Rekondo, Maria Antonia (1879)
Ugalde, Maria Epifania eta Sebastiana (1950)
Mendizabal, Jose Maria & Alberdi, Maria
Etxeberria Agote sendia

# 102. San Miguel

## Etimologia

Baserriak bere ondoan duen San Migel ermitaren izena hartzen du.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago. Herri-bide zaharraren inguruan dagoen laugune zabal batean dago, San Migel ermitatik oso gertu.




Koordenatuak:
UTM: X: 575823, Y: 4783719; Z: 109
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 0.2″, Lat.: 43º 12′ 6″, Alt.: 109


Zizurkilgo Udala

Baserriaren fatxada nagusia, dena eraberritu baino lehen (2000).

## Deskribapena

Baserria XX. mendearen hasieran eraiki eta orain dela gutxi eraberritu dute (2009). Oinplano angeluzuzeneko eraikina da. Harri-hormak ditu agerian beheko solairuan eta karez zurituak goiko solairuetan, harlanduzko eskantzuekin. Baoak oso arruntak dira (zurezko leihoburuak) eta oso modu homogeneoan antolatuta daude. Gaur egun erakusten dituen apaingarriak orain gutxi egindako eraberritzearen ondorio dira (zurezko egitura, adreiluzko estaldura, jabaloia). Hormigoizko terraza bat erantsita dauka ekialdeko hormaren kontra, fatxada horren parte bat estaltzen duena.

Fatxada nagusiko (Hegoaldekoa) beheko solairuan, berrikuntza lanak direla-eta, harlanduzko eskantzuak izandakoen aztarnak azaldu dira. Litekeena da arkupe moduko baten edo sarbide baten zati izatea, baina izan zitezkeen ere lehenagoko eraikin baten muga, gero berriro estalitakoa, harri-hormaren fabrikan ikus daitekeen bezala.

Eraikinaren barrualdeko egitura oso xumea da, etxea eraberritu zen garaikoa. Zenbait zutiko ditu, txineldunak, habeei eusteko.

## Historia

San Migel baserriaren jatorria estu-estu lotuta dago izen bereko santuaren ermitarekin. Ermita Miguel Okendo jeneralak eraiki zuen 1665ean, eta haren familiakoen jabetzakoa izan da. Ermitak, ekialdetik, alboan zuen seroraren etxebizitza, 1791n egindako plano batek erakusten duen moduan. Etxebizitza hori baserri bihurtu, eta baserria zein haren etxaldea errentan emango zituzten sarritan. Adibidez, 1815ean, bertako maizterra zen Martin Manuel Elizondok urtero ordaintzen zituen 44 erreal, 4 anega gari eta 2 kapoi.

1905ean baserria eta aldameneko ermita erre egin ziren, ustekabeko sute baten ondorioz. Bi eraikinak erabat eraberritu zituzten, eta garai hartan zuten itxura eta gaurkoan dutena oso antzekoak dira. Horrelako istripurik berriz gerta ez zedin, baserria metro batzuk urrundu zuten ermitaren hormatik. Hala ere, eraikin biak berriro elkartu egin dituzte orain gutxi eraiki den beste egitura baten bidez.


Kutxa Fototeka

San Migel ermita eta baserria (1994).


Zizurkilgo Udala

Millan Salaberria bere seme-alabekin, ermitaren aurrean: Baltasar, Pilar, Esteban, Joxe Manuel, Antonio eta Pedro Salaberria (1930).


Zizurkilgo Udala

Baltasar Salaberriaren eta Antonia Etxeberriaren arteko ezkontza, senargaiaren familiarekin (1955).


Zizurkilgo Udala

Esteban Salaberriaren Jaunartzea (1927).


Zizurkilgo Udala

Esteban Salaberriaren eta Euxebi Iraolaren arteko ezkontza (1953).

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1665)
Okendo, Miguel Carlos & Etxeberri, Antonia Maria (1681)
Okendo, Micaela & Agirre, Jose (1693)
Agirre, Jose Antonio & Jauregi, Ana & Sarria, Fausta & Altzaga, Maria Ines (1701)
Agirre, Jose Francisco & Porcel, Maria Teresa (1720)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1744)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Salaberria, Millan & Kortajarena, Maria (1939)
Salaberria, Esteban & Iraola, Eusebia

# 103. Sanmillan

## Etimologia

Izena, jatorriz, Aemilianusetik dator. Jatorria kontuan hartuta, etxe eta jauregi ere esan izan zaio eraikinari; azken garaiotan, berriz, Markesene izenez ezagutzen da.

## Kokapena

Zizurkilgo herrigunean kokatuta dago.

Etxeberritxo baserriaren alboan.



Koordenatuak:
UTM: X: 575267, Y: 4783588, Z: 117
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 24.9′′; Lat.: 43º 12′ 1.9′′, Alt.: 117


Baserriaren albo bateko fatxada (2009).

## Deskribapena

Jauregi-eraikuntza errenazentisten tipologiakoa da baserria. XVI. mendearen aurreneko hamarkadetan eraiki zuten, eta geroztik hainbat aldiz aldatu eta zaharberritu izan dute. Oinplano errektangularreko eraikina da, bistako aldean harlanduzko hormak ditu eta, nahiz eta geroztik hainbat bao ireki dizkioten ordena handirik gabe, jatorrizko itxura sendoa eta itxia gordetzen du egun ere.

Jatorrizko eraikinaren zenbait bao gordetzen ditu. Honako hauek, esaterako: Ekialdeko fatxadan irekitako erdi-puntuko arku dobeladunaren forma duten hiru sarbideak; beheko solairuko biak, nahiz eta Iparraldeen dagoena erabat ebakita dagoen berriki zabaldutako bao bat dela medio; eta beste bat lehen solairuan. Hegoaldeko fatxadan, berriz, bi konopial-leiho bikoitza ditu lehen solairuan. Itxuraz, baserria eraiki zenean mandio edo harrizko eskailera batetik sartzen zen lehen solairuko bao nagusira; gaur egun, ordea, ez dago jatorrizko mandio edo eskailera hori.


Alboko fatxadaren bao bikoitza baten xehetasuna (2009).

Gerora zabaldu (edo berreraiki) egin zuten aipatutako mandioa eta luzera handiagoa eman zioten. Hori dela eta, beheko solairuko sarbideetako bat erdi estalita geratu zen eta beste sarbide bat zabaldu zuten lehen solairuan, harlanduzko ingurua duen arku beheratuarekin. Itxuraldaketa hori ondo dokumentatuta ageri da eraikinaren XX. mendearen hasierako argazki baten bidez. Inondik ere, bizitzeko ez ezik nekazaritzarako eta abelazkuntzarako ere berregokitu egin zuten espazioa eta horrek ekarri zuen baserriaren itxuraldaketa. Gerora, beste aldaketa batzuk ere izan dira eraikinean: traza oso soileko bao berriak zabaldu dira inolako ordenarik gabe eta lehendik zeudenak berritu egin dira. XX. mendearen erdialdera, berriz, goiko solairura sartzeko mandioa bota egin zuten eta terraza itxurako hormigoizko eraikin bat jaso zuten haren lekuan.

Eraikinaren beheko egitura oso aldatuta dago; egitura horren zatirik handiena XIX. mendekoa da. Txinelak eta zeharkako tiranteak dituzten hainbat zutikoz osatuta dago egitura ; txinelak eta zeharkako tiranteak, berriz, alderik aldeko egurrezko ziriz egindako txabetaz lotuta daude.

## Historia

Sanmillan baserriari buruzko datu antzinakoena XV. mendearen amaierakoa da (1470); urte hartan, Martin Ruiz de San Millanek bizilekutzat hartu zuen baserria, Tolosako hiribilduaren jurisdikziopean. Eraikina, ordea, askoz lehenagokoa da, inolako dudarik gabe. Eraikinaren jabegoen artean, berariaz aipatzen dira honako hauek: *"Solar de Sant Millian e todas sus tierras e heredades e casillas e chiaribogas"*. Oinetxe hori izan zen seguru asko izen bereko leinuaren jatorria. Denboraren joanean, lurralde osoko familia nagusi eta boteretsuenetakoa bihurtu zen, batez ere Erdi Aroan. Zizurkilgo jatorrizko 21 oinetxeetako bat zen San Millan eta, horrenbestez, armarria izateko pribilegioa zuen. San Millan leinukoak Ahaide Nagusien artekoak ziren, gerrako jaun benetakoak, eta, beraz, garaiko liskar eta gatazketan sutsu borrokatu ziren: bandoen arteko gerretan, mugetako gerretan… Garai hartako eraikina erabat ezezaguna zaigu, ez baitago haren lekukotza fisikorik ez eta kokapenari buruzko ziurtasunik ere.


GAO. OA 6750

**Baserriaren fatxada nagusia, eraberritu aurretik (1932).**


Joxin Azkue

**Fatxada nagusia eraberritu ondoren (2004).**

**Teilatuaren egitura, alboko tiranteen bidez elkarri lotutako zutikoekin (2009).**





1791ko planoa San Millango Jauntxoaren jabetasunen mugekin.



XV. mendearen erdialdera, Gipuzkoako Ermandadeak dorre haiek guztiak botatzeko eta jabeak deserriratzeko agindu zuen (1457). Horren ondoren, berriro jaso zituzten eraikin haiek. Baina, antza denez, ez da hori ere gaurdaino iritsi zaigun eraikina; izan ere, 1513ko agiri batean Martin Ruiz de San Millanek adierazitakoaren arabera, bere aitaren denboran –hau da, Martin Ruiz nagusiaren garaian– etxea erabat suntsituta geratu zen sute baten eraginez (XV. mendearen azken hamarkadetan edo XVI.aren hasierakoetan). Denbora tarte laburrean bi aldiz berreraiki behar izan zuten, beraz, eta bigarren hartan jauregiaren itxura handiagoa eman zioten, garaiko zaletasun errenazentistei jarraituz. Horrez gain, eraikinek ezagun dute iragan militarraren zenbait zantzu, bai eraikuntzan bertan (eraikin sendoak, bao gutxikoak, harlanduzko horma sendoak, sartzeko mandioa), bai eta izendapenean ere, dorretxe izendatu baitzituzten aurrerantzean ere.

San Millandarrek, edo haien ondorengoek, etxeari lotuta jarraitu zuten XX. mendea ondo sartua zen arte. Nolanahi ere, eraikinak garaiz utzi zion familiaren bizileku nagusi izateari, San Millan leinukoek beste inguru erosoagoetara eta hobeto kokatuetara jo baitzuten; Donostiara, adibidez. Horrenbestez, antzinako jauregia zonaldeko etxalde bat gehiago bihurtu zen eta, baserri moduan, errentan jarri zuen familiak, baita gainerako jabegoak ere. Hona hemen, esaterako, 1703an maizterrak markesari urtean ordaintzen zion errenta: 1.650 erreal dirutan eta 4 kapoi; eta, horrez gain, 50 sagarrondo landatu behar zituen eta 600 haritz-landararentzako haztegia prestatu behar zuen.

XVI. eta XVII. mendeetan batez ere familia auzi dezentetan nahasi zen, bai senitartekoen beren artean herentzien banaketak zirela eta ez zirela, eta bai Zizurkilgo Kontzejuaren kontra, leinuaren pribilegioak eta jabegoak defendatze aldera. Ahalegin horrek ordain garestia ekarri zuen, oso garestia ere; izan ere, une batzuetan jauregia enbargatuta geratu zen eta hartzekodun ugarietako batzuek hartu zuten bizilekutzat.

## Baserriaren jabeak:

San Millan, Ruiz Martinez
San Millan, Rodrigo & Senper, Maria
San Millan, Martin Ruiz & Berrasoeta, Juana & San Millan, Juana Ruiz (1470)
San Millan, Martin Ruiz & Gabiria, Margarita (1505)
San Millan, Martin Ruiz & Lasarte, Isabel (1554)
San Millan, Juan Ruiz & Ugarriaras, Maria Lopez (1548)
San Millan, Millian Ruiz & Okendo, Maria (1590)
San Millan, Miguel & Okendo, Juana (1625)
San Millan, Teresa & Okendo, Miguel (1646)
Okendo, Miguel Carlos & Etxeberri, Antonia Maria (1681)
Okendo, Micaela & Agirre, Jose (1693)
Agirre, Jose Antonio & Jauregi, Ana & Sarria, Fausta & Altzaga, Maria Ines (1701)
Agirre, Jose Francisco & Porcel, Maria Teresa (1720)
Agirre, Joaquin & Bikuña, Maria Joaquina (1744)
Porcel, Luciano & Guirior, Asuncion (1816)
Porcel, Maria Blanca & Sangaren, baron (1877)
Bengoetxea, Millan & Tejeria, Canuta (1939)
Bengoetxea Tejeria sendia

# 104. Saratxoeta

## Etimologia

Baserriaren izenak *sarobe* hitza du sustrai, eta *–txo* atzizki txikigarria eta lekua adierazten duen *–eta* atzizkia sustrai horren lagun. Agirietan *Sarachota* (1539) edo *Sarobechoeta* (1752) esaten zaio inguruari.

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Mendi-hegalaren erdian, malda pikoa
eta sarbide zaila duen ingurune batean.

Koordenatuak:
UTM: X: 576224, Y: 4787586, Z: 207
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 40.5′′; Lat.: 43º 14′ 11.2′′; Alt.: 207




Patxi Otegi

Baserriaren egoera aurri-egoeran geratu aurretik (1987)

## Deskribapena

Baserria gaur egun aurri-egoeran dago. Oinplano errektangularra du eraikinak, bistan harri-hormak ditu eta harlanduak eskantzuetan. Gaur egun, ordea, ia erabat erorita eta landaretzak janda daude eskantzuak (1987an artean zutik zeuden).

Aspaldiko argazkietan ezagun da jatorrizko baoak traza oso soilekoak zirela, egurrezko leihoburuarekin; gerora, ordea, bao horietako batzuk handitu eta zabaldu egin zituzten partzialki. Hormapikoa irekita zuen eta alboko fatxadetako batetik sarbidea zegoen mandiora, aldapan gainera.

Baserriaren barneko egitura oso hondatuta dago, baina eskueran ditugun datuen arabera, oso traza soilekoa zen. Hainbat pilarek osatzen zuten egitura hori; pilareen gainean bermatzen ziren habeak, aho-zirikako mihiztaduren bidez.


Julian Arrastoa

Eraikina aurri-egoeran (2004)

## Historia

Saratxoeta baserria, jatorriz, XIX. mendekoa da; aurrez, ordea, San Millango jaunak beste etxalde bat eraiki zuen inguru horretan, bere artzain-sarobeetako baten jabegoa baliatuz. Horrelako hainbat etxalde eraiki zituzten garaitsuan, eta horrek gatazka ekarri zuen Kontzejuarekin, paraje haiek herri-larreetarako zirela esaten baitzuen aginteak. Azkenik, 1542an, hitzarmen bat sinatu zuten, eta horrek hainbat etxalde botatzera behartu zituen jabeak; haien artean Saratxoeta.

Gaur egungo baserria erdi eta erdi eraiki zuten Martin Antonio Irazuk eta Francisco Maria Barriolak 1823-1825 inguruan, aurrez Udalari erositako lursail batean (*"Sarachueta ichitua"*). Jabeen arteko gorabeherak zirela medio bi etxebizitzatan banatu zuten eraikina horma mehelin baten bidez; handik gutxira, ordea, jabego osoa Ignacio Etxanizen esku geratu zen (1830). Eraikin hori bera da ia gaur arte iritsi dena.


Zizurkilgo Udala

Iñaxio Maria Artola eta Maria Antonia Artola senar-emazteak Joxe, Joxepa, Juan, Iñaxi, Maria, Bibiana eta Anttoni Artola seme-alabekin (1949).

### Baserriaren jabeak:

Irazu, Martin Antonio & y Lizarraga, Maria Micaela (1826) A erdia
Irazu, Ana Josefa, Miguel Maria, Jose Joaquin, Miguel Joaquin eta Miguel Francisco (1827) A erdia
Barriola, Francisco Maria & Arregi, Micaela Josefa (1826) B erdia
Etxaniz, Ignacio Maria & Landa, Maria Teresa (1830)
Etxaniz, Santiago (1850)
Lizarzaburu, Manuel (1850)
Montes, Paulina (1874)
Montes, Manuela & Jose Joaquin Montes (1882)
Montes, Jose Ramon, Amalia Rufina, Pedro Pablo, Martin Antonio eta Felix Venancio (1880)
Montes, Martin Antonio (1934)
Artola, Ignacio & Artola, Maria Antonia (1935)
"Mendia-Papelera del Urumea Cia." (1951)
Gipuzkoako Foru Aldundia

# 105. Sarobe

## Etimologia

*Sarobe* edo *saroi* hitzetik dator baserriaren izena; artzaintzarako eta ganadua zaintzeko etxolak edo txabolak dauden lekuei esaten zaie sarobe.



## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Mendi-hegalaren erdian,
zelaigune batean.

Koordenatuak:
UTM: X: 574680, Y: 4783690, Z: 113
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 50.9″; Lat.: 43º 12′ 5.4″, Alt.: 113


Fatxada nagusia baserria eraberritu ondoren (2009).

## Deskribapena

Baserri barrokoa da, XVIII. mendean eraikitako baserrien egitura mota berekoa, nahiz eta oraindik orain guztiz eraberritu duten. Oinplano errektangularreko eraikina da, karez zuritutako harri-hormekin. Hainbat garaitan egindako eraikuntzen paramentuak eta zantzuak antzematen dira horma horietan. Harlanduzko eskantzuak gordetzen ditu ia eraikin osoan (Hegoekialdeko kantoian izan ezik), eta baoak oso traza soilekoak dira. Oraindik orain egindako eraberritzeak itxura homogeneoagoa eta bateratuagoa eman dio eraikinari, batez ere jatorrizko bao batzuk zaharberritzeari eta beste berri batzuk zabaltzeari esker. Alde horretatik, nabarmentzekoak dira egurrezko markoa duten sarrerako bi baoak; markoak harrizko poialen gainean jarrita daude. Era berean, agerian jarri dute fatxada nagusiaren eta alboko fatxaden erdialdean dagoen jatorrizko egituraren zati bat, egurrezkoa. Nolanahi ere, egitura horren beste zati bat geroztik eraikia da.


Sarobeko sendia
Ikuspegi orokorra baserria eraberritu ondoren (1994).

Eraberritu aurreko irudiak aintzat hartuta, eraikinak bi sektore nagusi zituen. Bat, alboko hormek bere harlanduzko eskantzuekin osatutakoa, itxuraz jatorrizko eraikuntzakoa (XVIII. mendea). Eta bestea, eraikuntzaren erdialdean egindako eraberritzea, mende bat geroagokoa, jatorrizko lerroaren aldean pixka bat atzeraemandako hormarekin. Itxura horri eutsi zaio oraindik orain egindako zaharberritzean.

Eraikuntzaren barneko egitura nahiko ondo gordeta dago; kanpoko egituran izandako aldaketak ezagun dira barnekoan ere. Txinelak eta alboko tiranteak dituzten zutikoz eratuta dago egitura; habeen pisuari eusten dioten perimetro-hormetan bermatuta daude zutikoak. Mihiztadura guztiak aho-zirika eran egindakoak dira, nanoak izan ezik; horiek kijera bidez mihiztatzen dira tiranteetara.



**Teilatuaren egitura eta alboko tiranteak horman bermatuta (2009).**

Sarobeko sendia



**Fatxada nagusia baserria eraberritu aurretik (1970).**



Sarobeko sendia

**Fatxadaren xehetasuna baserria eraberritu aurretik (1970).**



**Teilatuari eusteko egitura, alboko tiranteetan bermatutako nano eta besoekin (2009).**

## Historia

Sarobe baserria, jatorriz, inguru horretan ganaduarentzako zegoen bordaren batetik sortua da, inondik ere; ondoko Nekola baserriaren jabegoko bordaren batetik. Borda hori baserri bihurtu zuten gerora eta baserri moduan ageri da jada XVIII. mendearen hasieran (1717). Nolanahi ere, orain arte ez da jakin noiz eraberritu zuten zehazki. Hurrengo mendearen erdialdera, berriz, ia guztiz eraberritu zuen Jose Francisco Muñagorrik. 1861. urtean mailegu handi samarra eskatu behar izan zuen Muñagorrik, aurreko urtean erositako baserria berreraikitzeko. Hala jasotzen da agirietan maileguaren zergatia: *"costear el importe de las obras de reedificacion de la indicada casa de Sarobe"*. Eraikin hau eta Asteasuko Lasa etxea eta Zalduzar eta Nekola baserriak maiorazko batean bildu zituzten 1749an Miguel Ignacio Atorrasagastik eta Maria Antonia Ezeizak, familiaren oinordekotzari osorik eusteko helburuarekin. Maiorazkoak, ordea, oinordekotza horren jabeek enbargatzeko mehatxupean izan zituzten jabegoak 1857. urtean, hartzekodunen demandak zirela eta. Horren ondorioz, bi lotetan zatitu behar izan zituzten jabegoak: erdia jabearentzat geratu zen, Manuela Josefa Urkolarentzat, (Nekola baserriaren erdia, haren teileria eta aipagai dugun Sarobe baserria), eta gainerakoa zorrak kitatzeko erabili zuten. Neurriak epe motzerako konponbidea ekarri zuen, ordea; izan ere, hiru urte geroago, Manuela Josefak saldu egin behar izan zituen etxe hori eta gainerako jabegoak.

1887an eraikina honela banatuta zegoen: beheko solairua 2 sukalde, logela bat, 2 ukuilu eta ezkaratzarekin, eta solairu nagusia 2 logela eta bihitegiarekin eta goi-goian ganbara.

### Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Bartolome & Andiazabal, Graciana (1717 b.l.)
Beldarrain, Maria Francisca & Atorrasagasti, Pedro (1717)
Atorrasagasti, Miguel Ignacio & Ezeiza, Maria Antonia (1735)
Atorrasagasti, Maria Ignacia Antonia & Etxenagusia, Bernardo (1761)
Etxenagusia, Maria Josefa & Urkola, Francisco Javier (1789)
Urkola, Jose Ignacio & Larrunbide, Maria Rita & Aranburu, Maria Antonia (1820)
Urkola, Manuela Josefa & Alkorta, Juan Francisco (1852)
Muñagorri, Jose Francisco & Larrunbide, Juana Francisca (1860)
Ameztoi, Jose Benito (1862)
Ameztoi, Antonino (1905)
Ameztoi, Guadalupe (1947)
Ameztoi, Vicente; Juanmartiñena, Luis, Maria Concepcion, Maria Pilar eta Maria Consolacion (1947)
Eizmendi, Santiago (1950)
Iraola, Antonio & Elizegi, Concepcion (1957)
Azpiroz, Maria Isabel

# 106. Susperro

## Etimologia

Ez dakigu ziurtasunez nondik datorren Susperro baserriaren izena.

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta dago.
Mendi-hegalaren erdian, malda
pikoa duen ingurune batean.




Koordenatuak:
UTM: X: 576387, Y: 4783392, Z: 82
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 35.4″; Lat.: 43º 11′ 55.2″, Alt.: 82



**Baserria aurri-egoeran geratu aurretik (1987).**

## Deskribapena

Baserria gaur egun aurri-egoeran dago. Harri-horma batzuen hondarrak zutik daude oraindik ere, harlanduzko eskantzuekin, landare eta sasiek ia erabat janda (1987an zutik zegoen artean).

Aspaldiko irudien bidez dakigu oinplano errektangularreko eraikuntza zela, oso soila, karez zuritutako harri-hormekin eta harlanduzko eskantzuekin. Baoek oso traza soila zuten (egurrezko ateburu eta leihoburuak) eta fatxadaren goiko aldean hormapikoa irekita. Hegoekialdeko fatxada horrek, gainera, bi ostiko handi zituen, mendi-hegalaren aldapari aurre egiteko.

## Historia

Susperro baserriari buruzko lehenengo datu historikoa XVII. mendearen hasierakoa da (1618); zehazki, Zizurkilgo Udalak hiribildu-titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserrien zerrendan agertzen da: *"La casa de Susperro"*. Nolanahi ere, 1457rako jada Lope de Susperro abizeneko bizilagun bat ageri da agirietan, herri-basoen jabetzaren inguruko liskar batean nahasita. Beraz, litekeena da ordurako baserria eraikita egotea.



**Baserriaren alboko fatxada aurri-egoeran geratu aurretik (1987) .**

Idatzizko aurreneko erreferentzietatik Udalaren esku ageri da eraikina, baina ez dakigu Udalak berak agindu ote zuen eraikitzea. Udalak aldian-aldian errentan jartzen zuen eraikina. 1733an, maizterrak, Juan Alkortak, urteko errenta moduan, 10 dukat eman behar zituen, abuztuko Ama Birjinaren festetan plazan jarri ohi ziren hesiak *("barredas")* ipini behar zituen eta urtean 3.000 haga eman behar zituen festetarako.

Gerra Napoleondarrek eragindako neke ekonomikoak zirela medio, Udalak besterendu egin behar izan zuen ondarearen zati handi bat; besteak beste, etxalde hau. 1810ean Juan Bautista Irazuk erosi zuen baserria. Erosketaren ondoren, jabe berriak Legarraldeko oinetxearen maiorazkora gehitu zuen baserria.

1920an, hurbileko igeltsu-harrobiak ustiatzen zituen konpainia batek erosi zituen baserriaren lursailak.



**Baserriaren arrastoak (2005)**

## Baserriaren jabeak:

Udala (1618)
Tejeria, Jose (1810)
Irazu Legarralde, Juan Bautista & Eizmendi, Juana Josefa (1810)
Irazu Legarralde, Miguel Asencion & Larrarte, Maria Lorenza (1820)
Irazu Legarralde, Juan Ignacio & Tapia, Josefa Ramona (1856)
Irazu Legarralde, Antonia Maria, Severo, Gabriel Saturnino, Juan Rufino eta Sebastian (1902)
Lasa, Martin; Aizpurua, Juan Jose; Guridi, Jesus; eta Narbarte, Ignacio (1920)
"Aizpurua y Cia." Sozietatea; Cooperativa Patronal de Consumo de Materiales de Construccion (1926)

## Etimologia

Eraikinari *Olaza Torrea* (1608) edo, besterik gabe, *Torrea* (1636) esan izan zaio.

**Ustezko baserriaren kokalekua ikuspegi orokorra (2010).**

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta zegoen.
Zelaigune zabal batean dago kokatuta, gaur egun Adunatik Zizurkilera doan errepidetik gertu.






**Baserriaren gutxi gorabeherako kokapena, Olatza (goian) eta San Migel-Bidegurutze (behean) etxaldeen artean (2005).**

## Deskribapena

Baserria desagertuta dago gaur egun. Jakin, badakigu gutxi gorabehera Bidegurutze eta Olatza baserrien artean zegoela, baina toponimiako aztarna izan ezik, inguru hartan ez da geratzen baserriaren inolako arrasto fisikorik.

## Historia

Torre baserriari buruzko lehen datu historikoa XVII mendearen hasierakoa da (1608). Nolanahi ere, orain arte ez da jakin ahal izan zehazki noiz eraiki zuten. Izendapenari erreparatuta, pentsa liteke altuera handi samarreko eraikina izan zela, bidegurutze estrategiko batean kokatua, eta haren inguruan hainbat baserri zeudela hurbileko herrigune nagusitik bereizitako multzo bat osatuz. Kokapenari buruz ez dago zalantzarik; izan ere, 1760ko agiri batean hala zehazten da hitzez hitz: *"la casa solar Torrea …frente a la hermita de San Miguel"*.

Eraikinari buruzko datuak galdu egiten dira XIX. mendearen hasieraz geroztik; azkeneko albistea, hain zuzen, 1825. urtekoa da.

## Baserriaren jabeak:

Petri Ihartza, Mateo & Araneta, Catalina (1608)
Petri Ihartza, Mateo & Etxeberriaga, Cecilia (1636)
Petri Ihartza, Maria & Andiazabal, Miguel (1674)
Andiazabal, Fermin (1690)
Andiazabal, Josefa & Aldako, Gabriel (1722)
Aldako, Martin & Irigoien, Magdalena (1757)
San Millan, Juan Bautista & Larrondobuno, Maria Ignacia (1813 b.l.)
San Millan, Jose Bernardo (1813)




**Kokapenaren ikuspegia (2005).**

## Etimologia

Izendapena, itxuraz, *ur* eta *aran* hitzen uztartzetik dator; izan ere, jatorrian Oria ibaiaren aldamenean kokaturik zegoen baserria. Agirietan hainbat izendapen eman zaizkio baserriari: *Huare* (1611), *Ubarea* (1643) eta *Ugarea* (1676).

**Baserriaren antzinako kokalekuaren ikuspegi orokorra (2010).**

## Kokapena

Elbarrena bailaran kokatuta zegoen.

Baserriari berari izena eman zion inguruan.




Koordenatuak:
UTM: X: 576914, Y: 4782235, Z: 55
Geografikoak: Long.: -2º 3′ 12.6″; Lat.: 43º 11′ 17.5″, Alt.: 55



GAO. JDIM. 2-7-105

**Villabonatik Asteasu eta Zizurkilerako bide berriaren trazatuaren plano (1781. urtekoa). Markatutakoa seguraski Ugare baserria izango da.**

## Deskribapena

Baserria desagertuta dago gaur egun. Baserria Ugare Auzoko 18-19 zenbakien alturan kokatuta zegoen, Oria ibaiaren ertzean.

## Historia

Ugare baserriari buruzko lehen datu historikoa XVII mendearen hasierakoa da (1611). Nolanahi ere, orain arte ez da jakin ahal izan zehazki noiz eraiki zuten. 1772. urtean izandako auzi bati esker jakin ahal izan dugu baserria non kokatu zen gutxi gorabehera: agiriak Ugare etxearen ondoan zabaldutako bidearen berri ematen du eta zehazten du Oriaren ertzean zegoela baserria (*"se alla a la orilla del rio Oria"*), Villabonako burdinolaren parean hor nonbait (antzinako La Salvadora lantegia), eta egurrezko zubi mugikor bat zegoela oinezkoek ibaia gurutzatzeko (*"para vadear el rio por los peatones"*).
Mende horren beraren erdialdera agiriek diote etxaldea erre egin zela. Jabeek, Juan Bautista Uretak eta Magdalena Legarrak, eraikina berreraiki egin zuten ondorengo urteetan.
Baserriari buruz gure eskuetara iritsitako azken aipamena 1867. urtekoa da. Baserria 1970-1980ko hamarkada desagertutako da erabat.



Villabonako Udal Agiritegia

**Baserriaren kokapenaren erakusten duen 1970ko hamarkadan ateratako argazkia.**

## Baserriaren jabeak:

Legarra, Juan Martinez (1643)
Legarra, Magdalena & Ureta, Juan Bautista & Garmendia, Esteban (1676)
Ureta, Pedro Ignacio, Ana Josefa eta Mariana (1708)
Irulegi, Maria Josefa & Larreta, Jose Angel (1831)
Larreta, Segunda (1841)
Larreta, Maria Victoria & Zabala, Ladislao (1849)
Garaialde, Miguel Joaquin (1867)

# 109. Ugarte

## Etimologia

Ugarte oso abizen zabaldua da Euskal Herri osoan; *ur/ug* eta *arte* hitzen uztartzetik dator: ur edo erreken artean edo uhartea da, beraz, toponimoaren esanahia. Dokumentazioan beste forma hauekin ere agertzen da: *Huarte* (1616) eta *Ugarte-Zaldua* (1801).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Mendi-hegalaren erdian, ikuspegi zabaleko zelaigune batean.



Koordenatuak:
UTM: X: 574371; Y: 4783920; Z: 138
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 4.4′′; Lat.: 43º 12′ 13′′; Alt.: 138


Ugarteko sendia

Baserria eraberritu aurretik (1990).

## Deskribapena

Baserria oraindik orain eraberritu dute, ia goitik behera eraberritu ere. Oinplano errektangularreko eraikina da, Mendebaldeko fatxadan harri-hormak ditu bistan eta karez zurituak gainerakoetan. Harlanduzko eskantzuak gordetzen ditu oraindik, eta haien goiko aldean, ganbararen pare horretan, argi ikusten da eraikitzeko materiala aldatu egin zutela: behekoak kareharrizkoak dira eta goikoak, berriz, hareharrizkoak. Aldaketa horri erreparatuta ezagun da iraganean eraberritze garrantzitsuren bat egin zutela teilatuan, seguru asko goratzeko. Fatxada nagusian hainbat elementu gehitu dira geroztik apaingarri moduan: sarrerako baoa plakak inguruan dituela, egurrezko egitura eta hormapikoaren itxiera.
Eraikinaren barneko egitura erabat berrituta dago eta ez da geratzen jatorrizko eraikuntzaren elementu bakar bat ere.


Bartolome Auzmendi

Baserria eraberritu aurretik (1974).


Fatxada nagusia baserria eraberritu ondoren (2008).

## Historia

Ugarte baserriaren inguruko lehen datu historikoa XVII. mende hasierakoa da (1616). Nolanahi ere, 1391. urterako jada Ihoan de Ugarte abizeneko bizilagun bat ageri da agirietan; Zizurkil Tolosako hiribildura bildu zeneko aktan, hain zuzen. Beraz, litekeena da baserria ordurako eraikita izatea.
Jabeek errentan edukitzen zuten baserria. Hala, 1691. urtean, adibidez, Juan Lopez Beldarrainek 50 dukat ordaindu behar zituen urteko errenta moduan, lasto eta simaur guztia utzi behar zuen lurrak ongarritzeko eta sail bat prestatu behar zuen dozena bat gaztainondo landatzeko.
XIX. mendearen lehen hamarkadetan Gabriel Beldarrainek obra handia egin zuen baserriaren jabegoetan; hala, Ugarte Etxeberri esaten zaion etxaldea eraiki zuen, baita teileria bat eta ganaduarentzako borda bat ere, Ziortza inguruan. Garaitsu hartan berrituko zuten seguru asko baserria bera ere; aurrez aipatu dugun teilatuko lana gutxienez ordukoa bide da. 1865ean eraikina honela banaturik zegoen: beheko solairua sukalde, logela, soto eta ukuiluarekin, lehen solairua bihitegi eta logelekin eta, azkenik, ganbara.


Zizurkilgo Udala

Manoli Goenaga hiru seme-alabekin: Roxarito, Bernardo eta Maria Jesus Labaka (1965).


Zizurkilgo Udala

Juan Pedro Labaka eta Petra Goenagaren arteko ezkontza (1929).


Zizurkilgo Udala

Bernardo Labakaren jaunartzea (1968).


Zizurkilgo Udala

Juan Labaka eta Manoli Goenagaren arteko ezkontza (1958).



**Baserriaren alboko fatxada (2008).**

## Baserriaren jabeak:

Ugarte, Maria Juan & Etxabe, Joanes (1616)
Beldarrain, Miguel (1692)
Zaldua, Maria Ignacia & Beldarrain Ugarte, Francisco (1691 b.l.)
Beldarrain, Juan Francisco (1691)
Beldarrain, Juan Francisco & Etxeberria Otazu, Maria Ignacia (1758)
Beldarrain, Juan Francisco & Ezeiza, Ana Teresa (1786)
Beldarrain, Gabriel & Bengoetxea, Maria Catalina (1791)
Beldarrain, Francisco Maria & Maritxalar, Maria Francisca & Roteta, Maria Juana (1825)
Beldarrain, Jose Antonio (1840)
Beldarrain, Francisco Maria & Maritxalar, Maria Francisca & Roteta, Maria Juana (1841)
Beldarrain, Jose Maria & Barriola, Juana Antonia (1853)
Beldarrain, Juan Jose & Oiartzabal, Eustaquia (1886)
Beldarrain, Jose Domingo (1920)
Beldarrain, Jose Francisco, Francisco eta Maria Celestina (1924)
Eizmendi, Adrian & Goenaga, Petra & Labaka, Juan Pedro (1950)
Labaka, Juan & Goenaga, Manuela (1961)
Labaka, Jose Bernardo & Santa Cruz, Maria Cruz (1992)

# 110. Ugarte Etxeberri

## Etimologia

Ugarte etxaldearen lursailetan eraiki zen baserria eta hortik dator izena; osatzeko, berriz, *Etxeberria* gehitu zioten. Arrazoia begien bistakoa da. Eraikina izen hauekin agertu izan da dokumentuetan: *Ugarte-echeberria* (1825) eta *Ugarte-berria* (1828).

Joxin Azkue

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Malda handiko eta ikuspegi zabaleko zelaigune batean, Asteasuko udalerriaren mugetatik oso urrun ez.




Koordenatuak:
UTM: X: 573917, Y: 4784090, Z: 149
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 24.5″; Lat.: 43º 12′ 18.7″; Alt.: 149



Baserriaren kokapena (2009).



Joxin Azkue

Ugarte Etxeberri baserriaren borda, eta baserriaren beraren aurriak atzealdean (2005).

## Deskribapena

Baserria desagertuta dago gaur egun; non zegoen kokatuta besterik ez dakigu. Tokian harrizko bloke bakan batzuk baino ez dira ageri, landarediak erabat estalita; litekeena da eraikinaren arrastoak izatea.
Handik hurbil, zutik dago oraindik etxaldearen antzinako borda.

## Historia

Ugarte Etxeberri baserriaren historia laburra XIX. mendearen lehen hamarkadetan hasi zen: 1825. urtean, zehazki, Gabriel Beldarrainek eta Maria Catalina Bengoetxeak *Ugarte-Echeverria* etxea eman zioten dotean semeari, bien artean eraikitako etxea, idatzian bertan zehazten denez: *"construida por ambos …en los pertenecidos de la citada de Ugarte"*.
Eraikitako etxeak nahiko soila behar zuen: 1864an, beheko solairuan sukaldea, gela bat eta ukuilua zituen, solairu nagusian gelak eta goian ganbara. Ez dago datu zehatzik baserria noiz utzi zuten eta gerora aurri-egoeran noiz geratu zen jakiteko, baina 1960-1970 hamarkadetan gertatu zen gutxi gorabehera.

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Gabriel & Bengoetxea, Maria Catalina (1791)
Beldarrain, Francisco Maria & Maritxalar, Maria Francisca & Roteta, Maria Juana (1825)
Beldarrain, Jose Antonio (1840)
Beldarrain, Francisco Maria & Maritxalar, Maria Francisca & Roteta, Maria Juana (1841)
Beldarrain, Jose Maria & Barriola, Juana Antonia (1853)
Oiartzabal, Pedro Maria & Goenaga, Maria Jesus (1865)
Oiartzabal, Manuel Ignacio & Beldarrain, Catalina (1888)
Oiartzabal, Mamerta & Agirre, Jose Maria (1911)
Jauregi, Severino (1916)
Begiriztain, Angel (1916)
Begiriztain, Juan Martin & Segurola, Ramona (1944)

# 111. Zalduazpikoa

## Etimologia

Badirudi izenaren jatorria latineko *saltus* (zuhaizti) erroa dela, *azpikoa* adjektiboarekin batera, kokapen geografikoa adierazten duena. Dokumentuetan *Zaldua de medio* (1590) izena erabiltzen da baserria izendatzeko, beste baserri homonimo batzuetatik bereizteko; gerora, honela aipatzen dute: *Zaldua azpicoa* (1625) edo *Zaldua de yuso* (1686).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Zabalgune handi batean, ikuspen handia duen mendi-mazelaren erdialdean, Zaldugoena baserritik oso hurbil.




Koordenatuak:
UTM: X: 574291; Y: 4783586; Z: 115
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 8.1″, Lat.: 43º 12′ 2.2″, Alt.: 115



Baserriaren fatxada nagusia (2009).

## Deskribapena

Errenazimenduko baserria, dolare-baserriaren tipologiakoa. XVII. mendearen lehen erdialdean eraiki zuten, baina, gerora, berrikuntza-lan handiak egin zituzten XIX. mendearen amaieran. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, eta kareztatutako harri-hormak ditu. Baoen diseinua oso sinplea eta uniformea da, eta horien antolaketa homogeneoa da. Mendebaldera ematen duen fatxadan dauden bi baoak soilik izan daitezke jatorrizko eraikuntzakoak. Baoak harlanduz apainduta daude, eta horietako bat, beheko solairukoa, sarbide-baoa da.



Bartolome Auzmendi

Baserriaren fatxada nagusia (1974).

Jatorrizko eraikinean askotan egin dira handitzeko lanak, multzoaren oinplanoa erabat desitxuratu dutenak. Eranskin horietako batean (iparraldera ematen duen fatxadan erantsitakoa), prentsa mekanikoko dolarearen azpila dago, eta oraindik ere badabil.

Eraikinaren barneko egitura guztiz berrituta dago. Ukuiluan hormigoizko zutoinak jarri dira aurrekoen ordez, eta teilatupeko oinean jinbeladun zutiko sinpleak. Elementu esanguratsu bakarra bi dolare-habeak dira, iparraldera ematen duen erdiko habeartean daude, isolatuta daude eta ez dute jatorrian zuten kokapena.

## Historia

Zalduazpikoa baserriari buruzko lehen aipamena XVI. mendearen amaierakoa da (1590), eta *Zaldu de medio* izenez adierazten da, eremu horretan antzeko izena zuten beste bi baserrietatik bereizteko. Dena dela, data hori baino lehen Ihoan Yneguez de Çaldu abizeneko herritar bat ere aipatzen da, Zizurkil Tolosa hiribilduarekin auzotzeko hitzarmenean parte hartu zuela esaten da (1391), baina ezin dugu ziurtatu horietako zein baserritakoa zen.

Zizurkilen 21 jatorrizko oinetxe daude, eta Zalduazpikoa baserria horietako bat da. Beraz, armarria izateko ohorea du.

Baserriari buruzko geroztiko datuek ez dute bilakaerari buruzko informazio berri gehiegirik ematen edo ez dute baserriarekin zerikusia duten gertaera garrantzitsuen berri ematen. Nolanahi ere, arrastoek adierazten dute XIX. mendearen amaieraz geroztik egin zituztela, batez ere, hainbat berritze-lan handi, baserriaren jatorrizko irudia erabat aldarazi zutenak.

### Baserriaren jabeak:

Zaldua, Joanes (1590)
Zaldua, Martin (1616)
Zaldua, Bartolome (1686)
Zaldua, Jose (1746)
Zaldua, Maria Antonia & Mimendia, Jacinto (1754)
Mimendia, Maria Catalina & Irazu, Juan Bautista (1759)
Irazu, Fernando & Lejarizti, Maria Catalina (1789)
Irazu, Martin Antonio & Lizarraga, Maria Micaela (1815)
Irazu, Miguel Maria & Urkia (1827)
Irazu, Juan Jose & Atxaga, Maria Dolores (1871)
Irazu, Miguel Maria (1941 b.l.)
Irazu, Juan Jose & Pagola, Maria Concepcion (1941)
Irazu, Miguel Maria & Ugalde, Juana Maria
Irazu Ugalde sendia



Antzinako etxerako sarbide-bao dobelatua (2009).



Antzinako dolare-habeak, egungo egituran isolatuta (2009).



Oraindik martxan dagoen sagardo tolarearen torlojua.

Zizurkilgo Udala



Maria Concepcion Pagola alabarekin Donostian (1949)

Zizurkilgo Udala



Miguel Mari Irazu idiekin lanean (1968).

Zizurkilgo Udala



Juan Jose Irazu baserriaren sarreran (1964).

Zizurkilgo Udala



Juan Jose Irazu bilobarekin (1970).

## Etimologia

Badirudi izenaren jatorria latineko *saltus* (zuhaizti) erroa dela, goena edo *goikoa* adjektiboarekin batera, kokapen geografikoa adierazten duena. Dokumentuetan *Zaldu de medio* (1590) izena erabiltzen da baserria izendatzeko, beste baserri homonimo batzuetatik bereizteko; gerora, honela aipatzen dute: *Zaldua de suso* (1600) edo *Zaldua goiena* (1760).

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Zabalgune handi batean, ikuspen handia duen mendi-mazelaren erdialdean, Zalduazpikoa baserritik oso hurbil.




Koordenatuak:
UTM: X: 574286, Y: 4783619; Z: 118
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 8.3″; Lat.: 43º 12′ 3.3″, Alt.: 118


Patxi Otegi

Baserria berritu baino lehen (1987)

## Deskribapena

Duela gutxi erabat berritutako baserria. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, material modernoekin egina barruko egitura zein kanpokoa, eta ez du gorde antzinako eraikuntzaren arrastorik. Gaur egun, bi etxebizitzatan banatuta dago, eta horietako bakoitzak ditu erantsita nork bere eraikuntzak. Banaketa horren eraginez, nork bere eboluzioa izan du erdi horietako bakoitzak, nahiz eta egungo itxurak homogeneizatzeko joera adierazten duen.

Jatorrizko eraikinak kareztatutako harri-hormak zituen, eta hain adierazgarri zen egurrezko bilbadura zuen. Argazki zahar batzuetan oraindik ere ikus daiteke.


Zizurkilgo Udala

Baserria berritu baino lehen (1945), jatorrizko egurrezko bilbadura agerian duela.

## Historia

Zaldugoena baserriari buruzko lehen aipamena XVII. mendearen hasierakoa da (1600), eta Zaldu de suso izenez adierazten da, eremu horretan antzeko izena zuten beste bi baserrietatik bereizteko. Dena dela, data hori baino lehen Ihoan Yneguez de Çaldu abizeneko herritar bat ere aipatzen da, Zizurkil Tolosa hiribilduarekin auzotzeko hitzarmenean parte hartu zuela esaten da (1391), baina ezin dugu ziurtatu horietako zein baserritakoa zen.

Zizurkilen 21 jatorrizko oinetxe daude, eta Zaldugoena baserria horietako bat da. Beraz, armarria izateko ohorea du.

Jatorrizko eraikuntzan eraberritze-lan handia egin zuten XVIII. mendearen erdialdean; hain zuzen ere, errentatzaileak baserriarengatik eskuratutako errentaren zati handi bat zenbait lanetan erabiltzeko betebeharra izan zuen, premiazkoa zelako. Dokumentuetan adierazten denez, etxea *"se halla amenazando total ruina"* (1752). Eraikina bi etxebizitzatan banatuta zegoen, gutxienez, XIX. mendearen erdialdeaz geroztik. Izan ere, 1868an maizter horietako bakoitzak zenbait eranskinak *("aditamentos")* eginak zituen, gaur egun oraindik ere ikus daitezkeenak. Banaketa hori 1961. urtean formalizatu zen, jabeek maizter bakoitzari bere zatia saldu zietenean, Eta, hain zuzen, etxeari dagokionez, harrezkero ekin zion nork bere bideari. Horrenbestez, hegoaldera ematen duen erdia erabat berrituta zegoen 1987. urterako; eta iparraldera ematen duen zatia, berriz, urte batzuk beranduago.


Joxin Azkue

Baserriaren fatxada nagusia, berritu ondoren (2005).


Zizurkilgo Udala

Amona Maria Josefak 80 urte bete zitueneko eguna familia guztiarekin (1945).


Zizurkilgo Udala

Joxe Urkola eta Jexuxa Jauregi bere hamaika seme-alabekin, familia ugariaren liburuarako ateratako argazkia: Luis, Nekane, Andoni, Lourdes, Maritxu, Jon, Feli, Karmen, Iñaki eta Rosa. Beraiekin amona Maria Dolores Zubeldia (1969).


Zizurkilgo Udala

Joxe Urkolaren eta Jexuxa Jauregiren ezkontza (1950).


Zizurkilgo Udala

Nekane, Rosa eta Lurdes Urkola ahizpak (1975).



Zizurkilgo Udala

Jose Ignacio Tapia eta Juana Alkorta seme-alabekin: Jexuxa, Praxku, Joxe, Angel Mari, Eugeni, Dolores, Euxebi, Joxe Luis, Patxi, Maria, Rufina, Bittori eta Kontxi (1932).

## Baserriaren jabeak:

Zaldua, Domingo (1600 b.l.)
Zaldua, Gracia & Gorostidi, Domingo (1600)
Gorostidi, Clara & Mutio, Miguel (1666)
Mutio, Bartolome & Leiaristi, Ursula & Urbiztondo, Mariana (1701)
Mutio, Ana Maria (1748)
Mutio, Miguel Antonio & Arrastoa, Maria Brigida (1759)
Mutio, Gabriel Antonio & Atxega, Manuela (1787)
Mutio, Martin Jose & Etxaondo, Francisca Antonia (1810)
Mutio, Jose Ramon & Mendizabal, Maria Juan (1846)
Mutio, Martin Luis (1852 b.l.)
Mutio, Martin (1852)
Etxebeste, Josefa Antonia & Arrieta, Ignacio (1855)
Arrieta, Maria Angela, Maria Josefa eta Jose Francisco (1864)
Artola, Francisco (1869)
Rekondo, Manuel Jose & Etxeberria, Manuela Josefa (1902)
Rekondo, Jose Mari eta Juan Jose; Arin, Maria Carmen (1929)
Rekondo, Isabel (1941)

**Iparraldeko ½**

Rekondo, Maria Carmen & Aiestaran, Miguel (1959 b.l.)
Tapia, Maria Victoria (1959)
Iza, Yolanda

**Hegoaldeko ½**

Rekondo, Maria Carmen & Aiestaran, Miguel (1959 b.l.)
Urkola, Agustin & Zubeldia (1959)
Urkola, Jose & Jauregi, Jesusa (1961)
Urkola, Luis (1990)

# 113. Zalduzar

## Etimologia

Badirudi izenaren jatorria latineko *saltus* (zuhaizti) erroa dela, *zar* adjektiboarekin batera, agian horien artean zaharrena izateagatik, edo, besterik gabe, berritze-lan handiak egin ez izanagatik.

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago.
Mendi-mazelaren erdialdeko lautada
zabal batean; bertan, ikuspen handia dago.



Koordenatuak:
UTM: X: 574438; Y: 4783602; Z: 114
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 1.6″; Lat.: 43º 12′ 2.7″, Alt.: 114



Baserriaren atzealdeko fatxada (2008)

## Deskribapena

Harri-hormako baserriaren tipologiakoa da, egurrezko egiturarekin eta XVIII. mendean eraikia. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, kareztatutako harri-hormak ditu eta eskantzuetan harlandua. Jatorrizko baoak harlanduz inguratuta daude eta gainerakoak oso sinpleak dira. Horien artean, nabarmentzeko modukoa da fatxada nagusian (hego-ekialdea) dagoen sarbide-baoa, ateburu monolitiko handia baitu. Teilatupean hastiala zabalik dago.

Jatorrizko eraikina handitu egin da, hego-mendebaldera ematen duen fatxadaren aldetik —estalkia luzatu egin da—, eta ipar-mendebaldera ematen duen fatxadaren aldetik —eranskin bat gehitu zaio—.

## Historia

Zalduzar baserriari buruzko lehenengo aipamena XVII. mendearen hasierakoa da (1618); zehazki, Zizurkilgo kontzejuak hiribildu-titulua lortzeko kostua ordaintzen lagundu zuten baserrien zerrendan sartuta agertzen da: *"la casa de Zalduçar"*. Dena dela, data hori baino lehen Ihoan Yneguez de Çaldu abizeneko herritar bat ere aipatzen da, Zizurkil Tolosa hiribilduarekin auzotzeko hitzarmenean parte hartu zuela esaten da (1391), baina ezin dugu ziurtatu horietako zein baserritakoa zen.



Patxi Otegi

Baserriaren fatxada nagusia (1987).

Baserri hori, Lasa etxearekin (Asteasu) eta Sarobe eta Nekola etxeekin batera, maiorazko izatera pasa zen 1749. urtean, hala nahi zuten-eta Miguel Ignacio Atorrasagastik eta Maria Antonia Ezeizak, familia-ondareak osorik jarraituko zuela ziurtatzeko. Hala ere, hori ez zen oztopo izan aipatutako maiorazko horren jabeek, 1857. urtean, jabetzan zituzten ondareak galtzeko arriskuan izateko. Izan ere, hartzekodunen erreklamazioak direla eta, jabetzak bahitzeko arriskupean egon ziren. Egoera halakoa izanik, jabetzak bi multzotan banatu behar izan zituzten. Erdia Maria Josefa Urkola jabearentzat (Nekola etxearen erdia, haren teileria eta Sarobe etxea), eta, gainerakoa (Nekola etxearen eta Zalduzar etxearen beste erdia) zorrak kitatzeko erabili zen.

Jabeek eraikina alokatu egiten zuten normalean. Horrenbestez, esate baterako, 1773. urtean Juan Bautista Olarreagak hitzeman zuen urteko errenta honela ordainduko zuela: 24 dukat, 2 kapoi eta 50 zuhaitz landatzeko betebeharra haren lursailetan.



Zizurkilgo Udala

Zenbait lagun ehizan. Behean, eskuinaldean, Antonio Urkia (1972).

## Baserriaren jabeak:

Beldarrain, Bartolome & Andiazabal, Graciana (1717 b.l.)
Beldarrain, Maria Francisca & Atorrasagasti, Pedro (1717)
Atorrasagasti, Miguel Ignacio Antonia & Ezeiza, Maria Antonia (1735)
Atorrasagasti, Maria Ignacia & Etxenagusia, Bernardo (1761)
Etxenagusia, Maria Josefa & Urkola, Francisco Javier (1789)
Urkola, Jose Ignacio & Larrunbide, Maria Rita & Aranburu, Maria Antonia (1820)
Ardaiz, Nicolas & Aizkorbe, Luisa (1859)
Ardaiz, Miguel (1862)
**Baserri ½**
Urkia, Juan Fermin & Sorarrain, Micaela Josefa (1872)
Urkia, Maria Bautista & Roteta, Jose Manuel (1878 b.l.)
Roteta, Juan Fermin (1878)
**Baserri ½**
Urkia, Miguel Martin (1872)
Urkia, Martin Antonio & Elola, Antonia (1915 b.l.)
**Baserri osoa**
Urkia, Martin Antonio & Elola, Antonia (1915)
Urkia, Sabino & Atxaga, Salvadora (1966 b.l.)
Urkia, Antonio (1966)

## Etimologia

Izena *zara* (txara) erroak eta *–tegi/pegi* atzizki lokatiboak osatzen dute. Dokumentuetan izen hauekin aipatzen da: *Zapegui Echeverri* (1827), *Zapategui* (1846) edo *Zapegui* (1846).

## Kokapena

Mendibailaran kokatuta dago.
Mendi-mazelaren erdialdeko zabalgune batean, malda handiko eremu batean.




Koordenatuak:
UTM: X: 574715; Y: 4785529; Z: 189
Geografikoak: Long.: -2º 4′ 48.4′′, Lat.: 43º 13′ 5′′; Alt.: 189



Baserriaren alboko fatxada (2008).

## Deskribapena

Duela gutxi erabat berritutako baserria (1990ko hamarkadaren hasieran). Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, material modernoekin egina barruko egitura zein kanpokoa, eta ez du gorde antzinako eraikuntzaren arrastorik.

## Historia

Zarapegi baserria XIX. mendearen hasieran eraiki zuen Juan Pedro Arizmendik (1822. eta 1827. urteen inguruan), udal-jabetzako partzela batean, Arizmendiri eman ziotena gerra napoleonikoen garaian aurreratutako diruaren konpentsazio modura (*"caseria Zapegui Echeverri construyendola de nueva planta"* -1827-).

Jatorrizko eraikinaren diseinua nahiko sinplea zen; 1882. urtean beheko solairua, lehen pisua eta ganbara zituen. Duela gutxi egindako berrikuntza-lanen ondoren, eraikin haren arrastorik ez da geratzen.



Patxi Otegi

Baserria berritu baino lehen (1987)

## Baserriaren jabeak:

Arizmendi, Juan Pedro & Barriola, Maria Salvadora & Lizarraga,Francisca Ignacia (1822)
Arizmendi, Juana Francisca & Alegria, Jose Miguel (1846)
Ihartza, Pedro & Barbe, Brigida (1898)
Ihartza, Maria Filomena (1898)
Barbe, Brigida (1901)
Izagirre, Guadalupe; Barbe, Maria, Juan, Marcelina, Jose, Valentina eta Maria Esperanza; Barbe, Nieves Eugenia eta Toribia (1928)
Elola, Maria Isabel; Arnas, Miguel Maria (1990 b.l.)
Kamio, Jose eta Ignacio (1990)
San Sebastián, Maria Teresa & Aburuza, Miguel Maria

# 115. Zarateko Benta

## Etimologia

Izena *zara* (txara) eta *ate* hitzek osatzen dute, eta, izenarekin batera, garai batean bertan zuten jarduera adierazten duen hitza.

Joxin Azkue

## Kokapena

Irazu bailaran kokatuta dago. Garai batean bidegurutze estrategiko izan zen muino batean.

Koordenatuak:
UTM: X: 573508; Y: 4786199; Z: 379
Geografikoak: Long.: -2º 5′ 41.6″; Lat.: 43º 13′ 27.2″; Alt.: 379




Malli Usabiaga

Baserriaren fatxada nagusia eraberritu baino lehen (1998).



Baserriak gaur egun duen fatxada (2008).

## Deskribapena

Duela gutxi erabat berritutako baserria. Oinplano angeluzuzeneko eraikina da, bistako harri-hormak ditu eta eskantzuetan harlandua. Berritze-lanen ondorioz, jatorrizko baoen diseinua pixka bat aldatu da, hau da, berriak ireki dira eta batzuk handitu egin dira. Egurrezko bilbadura, hastialaren itxitura, teilatuhegalaren lanak eta sarrera nagusiko arku dobelatua ez dira jatorrizkoak, azken berritze-lanen ondorio dira, eta elementu apaingarriak baino ez dira.

Ekialdera ematen duen fatxadan aterpe bat erantsi zaio, harri-hormez itxia eta isuri bateko estalkia duena; inguruko mendizaleek aterpe gisa erabiltzen dute.

Eraikinaren barneko egitura guztiz berrituta dago.

Baserri honen inguruan eta Zaratezarreko harkaitza izenekoaren tontorretik gertu antzinako Zaratezar baserria izenez ezagutzen den parajea dago, eta paraje hori, hain zuzen, eremu horretan egon diren zenbait eraikinen garai bateko kokalekua izan daiteke.

## Historia

Zarateko Benta eraikinaren jatorria, izenak berak adierazten duenez, bide-bazterrean garai batean zegoen benta da, Gipuzkoako barrualdeko eta kostaldeko udalerrien arteko bidegurutze estrategiko batean kokatua. Hari buruzko lehen aipamen idatzia XVII. mendearen hasierakoa da (1619), nahiz eta zaharragoa izan seguruenik. Dirudienez, eraikina Zizurkilgo Udalak berak eraiki zuen, herrian beste zerbitzu bat gehiago izateko. Haren zaintza eta ustiapena alokairuan jartzen zuen, aldian-aldian. Antonio Otaegik 1733an, hain zuzen, urteko errentaren truke 33 dukat eman behar zituen eta 2.000 oin bete haritz zituen haztegi bat zaintzeko betebeharra zuen. Urte batzuen buruan, 1790ean, garai hartan maizter zen Manuel Lizargaratek urteko errentaren truke 54 dukat ordaindu behar zituen, behar beste ardo, ogi, lasto eta gainerakoak edukitzeko betebeharra zuen eta 2 karobi eraiki behar zituen lurrak ontzeko. Udalak 1817. urtean eraikina saldu behar izan zuen, zor ugari baitzituen, eta Juan Ignacio Loinazi saldu zion.

Baserri honetan, urteen joanean berritze-lan asko egin dira eta duela gutxi ere berreraikitze-lanak egin dira bertan. Horrenbestez, 1743. eta 1747. urteen artean eraikina erabat berritu zen, eta ogia egiteko labe berria eta sagardoa egiteko dolare berria jarri zituzten. XIX. mendearen amaieran, antza denez, jatorrizko eraikina suak hartu zuen eta erabat berritu zuten. Berritze-lan horretan etxebizitzarako beste solairu bat egin zuten (*"cuyo edificio habiendo destruido un incendio el antiguo ha sido recientemente reedificado de nueva planta con buenas paredes"* -1904-). Eraikin horrek ere ez zuen luzaro iraun, 1927 beste sute batek erabat kiskali baitzuen. Sutearen ondoren, beste eraikin bat eraiki behar izan zuten eta orduan utzi zion benta izateari. Gerra zibilean eraikina kuartela izan zen bolada batez, eta bonbardaketek kalteak eragin zituzten bertan.

**Alboko fatxada, estalpea aterpe gisa erabilita (2008).**

Zizurkilgo Udala



**Baserria 1958an.**

Joxin Azkue




**Fatxada nagusian jarritako eguzki-erlojua (2002).**

